# Hiztegi Errimatua

# Hitzaren Kirol Nazionala

Edizio Berritua

Xabier Amuriza

# Hiztegi Errimatua



# Hitzaren Kirol Nazionala

EDIZIO BERRITUA

X. Amuriza

# EDIZIO BERRITUARI GEHIGARRIA

HITZAREN KIROL NAZIONALA alean ageri zena baliozkotzat jorik, zerbait gehitzera eta zabaltzera nator. Errima ez da, edo ez luke izan behar, kontzeptu amaitua eta estatikoa, bilakaera dinamikoa baizik.

Hiztegi errimatuaren joko nagusia, hotsen berdintasunaz gainera, hotsen kidetasunetik planteaturik dago. Horretan lehen edizioaren banakuntza bere hartan utzi dut, guztiz baliozkoa delako, eta egitura aldatzeak nahaspidea lekarkeelako.

Baina hotsen kidetasuna –kontsonanteena alegia– zabalago hartzea ere badago, azken bi silabetako bokalekin jokatuz. Hemen, lehengoaz gainera, oso oihan anizkoitza zabaltzen da, non bakoitzak bere sen askea gara dezakeen. Askatasuna edertasunaren eta kalitatearen barruan noski. Bistan dago nire asmoa ez dela errima txarren exhibizioa egitea.

Errima onaren barruan, konbinapide ugariagoak bariazio aberatsagoa dakar, eta hori oso garrantzitsua da, inertzia eta errepika mekanikoa hain errez lerratzen diren inprobisazioan. Hiztegi honen oinarrizko garapena zenbait kontsonante kidetzat jotzetik dator. Hauek dira multzoak: B-D-G-R, K-P-T, N-M, L, RR, S-Z-X eta TS-TZ-TX. Lehen saila harturik, B, D, G eta R biguna elkarrekin nahasgarri dira. Aurreko silabako bokala berdina izanik, errima ona osatzen dute. Adibidez, *laga-gaba-bada-gara* errima ontzat jotzen ditugu. Ez al dago lau kontsonante horiek beste zenbait kontsonantez ere nahasterik? Hona bertso posible batzu:

1. Kantuan daramagu
ia ordu bete
noiz pasatu duzue
honenbeste neke?
Nik jarraituko nuke
beste hainbat ere
titulua baitaukat
akainen errege.

2. Taulatura ez gaituk
egotera igo
baina ez gaituk berton
hil arte ariko.
Beraz goazen jaistera
geldiro geldiro
bidali ez gaitzaten
herritik betiko.

3. Ez naiz herri hontara
etortzeaz damu
halako xarma edo
enkantu bat badu.
Bere edertasuna
kantagai daukagu
baten batek oraindik
hatzeman ez balu.

4. Non kontatu dizute
historia hori?
Ni ere nabil nahiko
urri eta gorri.
Bistatik joatearren
xentimo bat tori
gastatzen duzunean
berriro etorri.

5. Hau da eman diguten
okela asea
eserita mindurik
ez banu atzea!
Amaituko al dugu
egungo klasea
lortzen baldin badugu
sano altxatzea?

6. Zer pentsatua badu
auzoko Maribik
bart bere maitaleak
bisita eginik.
Ez dagola munduan
halako mutilik
txakurra ere egon
omen zen isilik
eta noski ez zidan
kontatu erdirik.

7. Urteek jartzen dute
gizona makurrik
hori esan zuenak
ez zion gezurrik.
Ezingo diat eman
pozteko mezurik
lurra tiraka hasi
zaikala zirudik.

Bertso hauek ariketa soilak dira, pieza gisa baliorik ez daukatenak. Errima aldetik ordea, onak dira. Eta begira zeintzuk multzo konbinatu diren. Lehen-bigarrenetan B-D-G-R + K-P-T. Hirugarrenean eta seigarrenean B-D-G-R + N-M + L. Laugarrenean eta zazpigarrenean B-D-G-R + RR. Bosgarrenean S-Z-X + TS-TZ-TX.

Goazen orain multzo ezberdinen konbinapen neurrigabeetatik adibide sorta ugari batzuk ematera. Patroi nagusiari jarrai, oin laukoteak ematen ditut, baina, bistan denez, gehiago ere izan litezke, segun zer neurri den.

## G-B-D-R + K-P-T

– Jo ta ke, litake, dirade, nahigabe.
– Bete, neke, ere, errege.
– Ote, legoke, gerore, hobe.
– Bati, daki, kabi, hadi.
– Bedi, beti, ireki, gehiegi.

– Toki, egoki, erori, grogi.
– Erruki, eduki, dirudi, isuri.
– Harago, badago, dalako, baterako.
– Gordeko, lepo, balego, gero.
– Igo, ariko, geldiro, betiko.
– Joko, igoko, idoro, gogo.
– Zaletu, leku, hobe du, dukegu.
– Ditu, mediku, digu, gatibu.
– Planta, hanka, danba, samba.
– Arpa, barka, karga, behar da.
– Tente, menpe, jende, mende.
– Argi, garbi, jarki, aurki.
– Senti, ozenki, sendi, banendi.
– Kanpo, planto, zango, jango.
– Trinko, finko, bingo, egingo.
– Ardo, mardo, txarto, beharko.
– Kantu, tantu, berandu, eman du.
– Talentu, kontentu, omen du, bagendu.
– Kontu, konpondu, ondu, non du.
– Hartu, barku, kargu, behar du.

## B-D-G-R + L + N-M

– Gabe, gale, kale, Nekane.
– Ere, ele, ene, seme.
– Bide, nire, egile, errime.
– Hobe, gerore, jagole, Jondone.
– Agure, inude, xume, entzule.
– Honi, hori, hilobi, Imanoli.
– Itzuli, isuri, guri, laguni.
– Xalo, dago, sano, luzaro.
– Lelo, gero, bego, beno.
– Umo, nulo, zulo, agudo.
– Damu, badu, daukagu, balu.
– Mantenu, bagenu, ganbelu, hobe du.
– Titulu, ditugu, hartu du, seguru.

## RR + B-D-G-R

– Ari, igari, igarri, mingarri.
– Arre, barre, bare, gabe.
– Berri, aterri, ageri, gehiegi.
– Irri, zirri, hiri, agiri.

– Hori, gorri, tori, etorri.
– Harro, hago, brabo, zigarro, txarrago.
– Ero, erro, gero, lerro.
– Barru, badu, baru, marru.

## S-Z-X + TS-TZ-TX

– Asea, atzea, klasea, salatzea.
– Hezea, hobexea, bertzea, lehertzea.
– Haizea, eklipsea, klitxea, bizitzea.
– Gosea, hangoxea, jotzea, kotxea.
– Luzea, altuxea, gurutzea, ezagutzea.
– Gazi, ikasi, idatzi, amatxi.
– Merezi, ihesi, gaitzetsi, hemeretzi.
– Bizi, lehenbizi, iritxi, amabitxi.
– Josi, erosi, egotzi, mainontzi.
– Utzi, guzi, gutxi, nagusi.
– Laxo, jaso, atzo, mantso.
– Beso, preso, bertso, ezertxo.
– Iso, mintzo, kaixo, gutxitxo.
– Oso, temoso, txotxo, dinotso.
– Kasu, ezazu, mehatxu, halatsu.
– Kexu, diezu, kementsu, probetxu.
– Usu, musu, kutsu, amultsu.

## NIK + LIK + RIK

– Danik, barik, zabalik, jadanik, animalik.
– Lehenik, legerik, ergelik, zurikerik.
– Eginik, erdirik, mutilik, isilik, Maribik.
– Egonik, gogorik, odolik, Manolik, teorik.
– Lagunik, zirudik, bururik, alu bik, Irurik.

## RIK + RRIK

– Barik, bakarrik, prakarik, zakarrik.
– Alperrik, aterik piperrik, egiterik.
– Gogorik zororik, jatorrik, potrorik.
– Makurrik, gezurrik, mezurik, zirudik.

## SIK-ZIK + TSIK-TZIK

– Kasik, gatzik, kapazik, lorratzik.
– Ezik, ametsik, babesik, ezetzik.
– Baizik, gaitzik, bortitzik, krisisik.
– Pozik, bihotzik, sosik, zortzik.
– Biluzik, Jesusik, hutsik, funtsik, gutxik.

Adibide ugari hauek konbinapen ezberdinen erakusgarri besterik ez dira. Normalean ez da honela errimatzen, bat batean behintzat. Honek ez du esan nahi beti honela errimatu behar denik, honela ere errima litekeela baizik. Errimaren obligazio bakarra –eta ez txikia– minimo batetik gora ibiltzea da eta adibideon asmoa minimo hori sobera gainditzen dutela erakustea da. Errima onak dira, bai: *daki-ireki-egoki-erruki*. Bai: *daki-izaki-ebaki-diraki*. Bai: *daki-bati-zapi-izaki*. Baita: *bati-daki-kabi-hadi* ere. Lehen hirurak bagenezkien eta lehen bezain on izaten jarraitzen dute. Hemen azkenengoa ere ona litzatekeela esaten ari naiz, zein hobea den eztabaidan sartu gabe.

Hiztegia berritzean, inolako tentaziorik ez dut izan, bere egitura erizpide zabalago hauen arabera aldatzeko. Sailkatzeak, esparru handiegiak hartzen badira, ez dauka inolako onura praktikorik. Oihana zatitzen hasi eta zati bakoitza berriz oihan gelditzekotan, ezer gutxi aurreratzen dugu.

Baina argi dago hiztegi honek errespetatzen jarraitzen duen lehen egituran, sail batzuk oso ugariak direla, beste batzuk ez hainbeste eta batzuk nahiko edo oso urriak. Adibidez, **ba-da-ga-ra** sailean, aurreko bokala **a** nahiz **e** dela, –*gera, bera, atera, aurrera, aukera, minbera*... etab.–, bada aski ugaritasun, kontsonante horiekin bakarrik nahi beste bariazio aurkitzeko. Beste batzutan ez hainbeste, eta orduan bertso bat, adibidez, *dago* oinez hasten bada, ia aldez aurretik dakigu ondoren *gehiago, lehenago, esklabo, akabo* eta gisakoak etorriko direla, azken biok gehienean gaizki edo artifizialki sartuak. Erizpide zabalago honek zenbait errimakera entzunegiren errutinatik aska gaitzake.

Ez da, ordea, auzia negatiboki kontsideratu behar, urritasun kasuen salbagailutzat. Errima kontzeptu positiboa da eta sailik ugarienetan ere konbinapen ezberdinek kolorea aldatzen dute, ezusteak eraginez. Elementu mekaniko soila ezezik elementu dinamikoa da. Zenbat eta biziagoa izan, hainbat eta tresna aberatsagoa. Eta hori, errimari dagokionez, bariaziotik dator eta bariazioa konpinapen ezberdinen ahalbideak bakarrik dakar.

Emandako sortetan, adibiderik gehienak artikulu mugatzaile gabe daude, hitzak hiztegian datozen bezala. Bistan da artikulua har dezaketenei hura eransteak errima sendotu egingo diela, edo normalean behintzat ez duela eskastuko. Zergatik eskastu, elementu bat gehiago sarturik? Honek komentario txiki bat merezi du.

Artikulu mugatzailea oso elementu arrunta da, nahitaezkoa kasurik gehienetan. Euskarazko errimaren muga handietariko bat hain zuzen artikulu

mugatzailearen presentzia ia baztergaitza da. Oso kasu bakanak dira hitzak era mugagabean zuzen gelditzekoak. Hitzak hiztegian datozen moduan –*oso, uso, pauso, eroso* etab.– nekez utz daitezke horrela. Gehienean *osoa, usoa, pausoa, erosoa*... etab. izango dira. Artikulu mugatzailearekiko menpetasun hau hizkuntzaren beraren ezarpena da. Artikulua aurretik jartzeko egitura daukaten inguruko hizkuntza guztiek, alde horretatik eta errimari dagokionez, gurekiko abantaila handian daude. Gure deklinabideak badauzka bere aldeonak errimarako, kasu guztien atzizkiak –*nor, noren, nori, norentzat, norako* etab.– azken doazelako. Baina horrek ondorioz hitza bere forma mugagabean uzteko ahalbidea ia minimora jaisten du. Eta hau errimarako oso eragozpen handia dela aitortu behar, euskarak daukan handiena. Hiztegian aurkitzen duzun milaka hitz –eta beraz milaka errima posible– ezin da horrela kantatu, atzetik gehienean artikulua edo deklinabidea erantsi behar zaiolako.

Guzti honetatik ateratzen da artikulu mugatzailea oso elementu arrunta dela, ia mekanikoa, nahitaez errepikatu beharrekoa. Hura ezartzeak ez dio bizitasunik eransten errimari, bai ordea kentzeak, orduan hitza era ezohikoan gelditzen baita. Beraz, paradoxaz, elementu bat gehitzeak errima indartu barik ahuldu egingo luke. Bilintxen *Loriak Udan* sortako lehen bertsoan oin hauek datoz: *Gazte bat, beste bat, aste bat, triste bat.* Ez zen hainbeste aldiz aipatua izango, oinak honela baletoz: *Gaztea, bestea, astea, tristea.* Non dago aldea? Batean artikulu mugagabea daramala eta bestean mugatzailea. Hau hitzari erantsita idazteak ez du gakorik aldatzen. Batean **bat** lau aldiz jartzea poto bada, zergatik ez bestean **a** lau aldiz errepikatzea? Eta hala ere, hura gaur pototzat joko genuke, nik behintzat, eta ez ordea artikulu mugatzaileduna. Arrazoia sinplea da. Artikulu mugatzailea euskararen betekizun bat dugu. Ezin zaio ihes egin. Hori pototzat ekiditen hasiko bagina, ezingo genuke euskaraz hitz egin.

Iruzkin hauen ondoren, arestian emandako oin zerrendei artikulu mugatzaileak zer egingo lieke? Indarra gehitu ala gutxitu? Bi silabarekin, azkenarekin eta .aurrekoarekin, jokatzen dela emanik, gauzak berdintsu edo indartuago utziko lituzke, oro har. Baldin *agure-inude-xume-entzule* errima ontzat jo badira, areago beharko dira *agurea-inudea-xumea-entzulea.*

Silaba bakarra edo azkena bakarrik hartuz gero, beste kontu bat litzateke, aurrerago, errimaren azalpen orokorrean, azaldua denez. Azken silaba hutsarekin jokatuz, bistan da errima ona atera daitekeela, aurreko silabaren bokala ezberdina izan arren, baina orduan silaba errimatzailearen kontsonanteak denetan berdina behar du. Esaterako:

– Oparo, bero, oro, aguro.
– Kalte, bete, maite, diote.
– Ari, hori, guri, ageri.
– Grazi, berezi, bizi, guzi.
– Lotsabako, menpeko, gogoko, orduko.

Hauek errima onak dira, nahizta azken aurreko bokalak aldatu. Baina aldi berean azken silabak kontsonante berari eusten dio, denetan RO, TE, RI, ZI edo KO eginez. Gaizki al legoke, adibidez, *kabi-bedi-hori-mugi*? Hiztegi hau ez da arau emale. Egitura bi silaba kontuan harturik egina da. Azken silaba hutsez nahiz beste nolanahi jokatu nahi duenak badaki hitzak non aurki ditzakeen eta horixe da behar dena.

## ERRIMA BARRUKO TRANSIZIOAK

Errimatzen duten oinak erreskan doaz, ez denak batera. Beti ere lehen oina bigarrenarekin lotuago dago azkenarekin baino, eta hala beste guztien kasuan. Orduan batetik bestera transizio egoki bat eginez gero, bertan segi daiteke, edo bertan ondo amaitu, azkena bada. Adibidez:

– Lepo-menpeko-gogoko-gorroto.
– Hori-horri-berri-irri.
– Daukagu-soldadu-badu-barru.
– Nahiago-baitago-faltako-zertako.

Lehenengoan *gorroto* ondo dator *gogoko*-rekin, hau *menpeko*-rekin eta hau *lepo*-rekin, nahizta *lepo-gorroto* jarraian ez leudekeen hain ondo. Bigarrenean *hori-horri* da transizioa, hirugarrenean *badu-barru* eta laugarrenean *baitago-faltako*. Errima joankorraren kontzeptu honek joko handia eman lezake. Puntuak banaka eta bata bestearen ondoren entzuten edo irakurtzen dira. Batetik besterako jauzia naturala baldin bada, belarririk ez da minduko. Gerta daitekeen bakarra da ondorioa ez dela lerro zuzena izango, kurbatua baizik. Hau ere ez al da efektu polita?

## ERRIMA PROGRESIBOA

Transizio horiek behin baino gehiagotan edo agian etengabe aplikatzen baditugu, errima etengabe progresiboa ateratzen zaigu. Ibilbide etengabe kurbatua edo sigi-saga leundua bezalakoa. Adibidez:

– Jo ta ke, neke, nuke, digute, dituzte.
– Gale, gabe, hobe, ote, dute, urte, uste.
– Adi, bedi, beti, baneki, toki, noski, guzti.

Badirudi *jo ta ke-dituzte, gale-uste eta adi-guzti* bata-bestetik urrun daudela, eta hala daude egon ere, bakoitza punta banatan. Ez dio ardura. Errimaren sentsazioa erreskan dator, hurrengoz hurrengo. Katebegiak elkarrekin ondo badatoz, katea ez da trabatuko.

Joko hau urrunago eramanik, abenturak egin litezke. Adibidez: *Hemen, eten, urten, urte, bete, neke, merke, eske, dioste*. Erreskada honetan *hemen* eta

*dioste* lekutan daude. Agian transiziorik ezohikoena *urten-urte* liteke, baina bi hitzok ez al dute ondo errimatzen, ia hots bera baitaukate?

Hau dena abentura bat baino areago, oso baliabide praktikoa izan liteke, batez ere bertso luze samarretan. Ez dago nahitaez progresio etengabea eraman beharrik. Aski da erdi inguruan edo nahi den lekuan transizio txiki bat egitea, errimak beste erreztasun eta beste adierazpide bat hartzeko. Estuan joateak sarritan sarrerazten dituen oin bortxatuak eta tokiz kanpokoak ekidin ahal izatea ez da alde makala.

## NOR, NORK ETA PLURALA

Hitz batek forma berarekin bi kasu ezberdin adieraz ditzake: *Astea ona izan da* edo *astea ohean iragan dut*. Lehenengoa aditzaren nor singularra da eta bigarrena konplementu singularra. Berdin *asteak zazpi egun dauzka* edo *asteak egin ditut ohean*. Lehenengoa ergatibo singularra, bigarrena konplementu plurala. Ergatibo pluralari ere gehienean forma bera ematen diogu: *lagunak esan dit-lagunak esan didate*. Idaztean, *lagunek esan didate* jarriko badugu ere, hizkeran eta bertsotan, ergatibo pluralean ere, *lagunak* esan ohi dugu. Forma hau, beraz, –*lagunak, asteak, gizonak, txakurrak*...– hiru gauza izan daiteke, segun aditza nola daraman.

Bertso bat nor singularrean edo konplementu singularrean hasiz gero, oin guztiak halaxe eraman beharra dago. Berdin ergatiboan edo pluralean hasten bada ere. Gertatzen dena oin guztiak ergatiboan edo pluralean osatzea askoz ere zailagoa dela, hizkuntzan singularra baita nagusi, oso hein handian gainera. Demagun *ongi pasa karnabalak* amaitu nahi dugula bertsoa. Orduan hor hasten gara *zabalak, eginahalak, hegalak, naturalak, makalak, formalak, tamalak*... eta horrelakoen bila. Esakera artifizialak eta bertso bortxatua ateratzeko arrisku handia dago hor. Demagun orain *pasa zazue ongi aste kulturala* esatera goazela. Aurreko hitz berak singularrean askoz ere errezago eta naturalago sartu ahal izango ditugu. Eta gainera singularrean beste zenbait baliabide garrantzitsu ere sar dezakegu: aditzak –*dala, gerala, gaitzala, dezala*...– adberbioak –*hala, berehala, bezala*...–, eta abar.

Proba dezagun singular-pluralak nahastetik zer datorren. Adibidez:

> Saioa hola buka beharrak
> ematen digu tamala
> baina diote agur eginda
> joateko ordua dala.
> Lotara zuzen joan zintezke
> baldin bazara formala
> eta kalean galtzen bazara
> ongi pasa karnabalak.

Errima txarra al da hau? Azken **K** hori, hots aldetik, gorabehera txikia dela iruditzen zait. Hain txikia, ezen askotan, puntuka ari garela, batek pluralean hasten duena besteak singularrean jarraitzen du. Errakuntza maizkor horrek adierazten du hots horren presentzia oso ahula dela, ia inexistentea. Areago dago hizkuntzaren egituran edo hizkuntz ezagutzaren inferentzia oharkabean, belarrian bertan baino.

Berdintsu gertatzen da non kasuko **N**-rekin ere. Zer esan dik, *handia* ala *handian*? *Etxea* ala *etxean*? Hamaika holako gertatzen da bertsolarien eta entzuleen belarrian. Hona bertso posible bat:

Orduerdi bat hor pasa zaigu
hasteko edo hastear
noizbait bagatoz, kaixo lagunak
berdin zahar eta gazteak.
Batzutan doble gozatu ohi da
handi ta txiki nahastean
ea egizko gozamena den
zuen antzerki astea.

Hona beste zenbait oin sorta posible:

– Lorea, folklorean, koloreak, balorea.
– Aldea, galdea, artaldea, goizaldean.
– Afaria, atarian, nabaria, janariak.
– Sarraskia, narrastiak, argazkian, azpian.
– Nola, kaiolan, arbolak, axola, dagola.
– Alea, kaleak, zaleak, ospitalean.
– Ikaragarria, ezin igarrian, belarrian, egarriak.
– Barruan, larruan, marruak, amorruak.
– Osoa, gozoak, erosoan, inozoak.

Oin hauekin eduki ona sortzen duen bertsoak ez du belarririk mindu-ko, lehenengotan arraro samar gerta balekio ere. Bi kontsonante horiek gora behera, azken bi silabetan –eta inoiz hirutan– hoskidetasun indartsuegia dago, errima gaitzesgarria dela esateko. Errima asonanterantz goazela? Lehen ere horretantxe ari gara, kontsonante kideak edo hots berdinak ez direnak konbinatzean. *Habe-gabe-jabe-labe* errima kontsonantea da, baina *hage-gabe-gale-pare* asonantea. Hiztegi honen klabe nagusia asonantziaren eremu batez baliatzea da hain zuzen, eta eremu hori gehiago zabal daitekeela esaten ari naiz.

Berritasun bakarra da azken hizkitzat ez dela kontsideratu kontsonante ezberdinen ahalbidea, edo kontsonante bat, gure kasuan **K** eta **N** batez ere, agertzearen edo ez agertzearen egokitasuna. Zergatik ez hori ere, errima zuzen, eder eta ahalbide berrien ekarle bada?

# HIZTEGIAREN EGITURA

Hiztegi Errimatu honen arrazoiketa edo teoria HITZAREN KIROL NAZIONALA izeneko liburuan ikusi beharra dago. Han aletzen da errimaren funtsa eta hiztegi honetako sailkapenaren zergatia. Hala ere, beharrezko da, laburki bada ere, hiztegi honetako bi sailkapen mota nagusiak ematea, nola egina den eta nola doan jabetzeko.

## SAIL NAGUSIAK

Hiztegia bederatzi zatitan edo sail nagusitan banaturik dago. Lehen zazpi sailek kontsonanteei jarrai eginiko banakuntza dute. Zortzigarrenean diptongoak datoz eta bederatzigarrenean BESTE BATZU, gehigarri gisa, hiztegi honen egituran sartzekoak ez badira ere.

Kontsonante batzu kideak edo antzekoak dira. Familia bat egiten dute. Beste batzu bakarrak dira, ez baitute ahaide hurbilik. Hona nola ordenaturik doazen sail nagusiok:

1) **B-D-G-R**. Azken silaban kontsonante hauetariko bat daramaten hitzen saila. Sail honen barruan anitz sailtxo dator: BA-DA-GA-RA; BE-DE-GE-RE; BI-DI-GI-RI; BO-DO-GO-RO; BU-DU-GU-RU; RBA-RDA-RGA; RBE-RDE-RGE; eta abar. Anitz sailtxo, baina denak kontsonante horien inguruan.
2) **K-P-T**. Hauekin osatzen dugu bigarren familia edo sail nagusia. Hemen ere sailtxoak pilaka dira: AK-AP-AT; EK-EP-ET; IK-IP-IT; OK-OP-OT; UK-UP-UT; KA-PA-TA; KE-PE-TE; eta abar.
3) **M-N**. Bikote honek, N-ek batez ere, sail asko dauka: AN, EN, IN, ON, UN; AIN, EIN, OIN, UIN; MA-NA, ME-NE, MI-NI, MO-NO, MU-NU; eta abar.
4) **L**. Hau kontsonante bakartzat hartzen dugu: AL, EL, IL, OL, UL; LA, LE, LI, LO, LU; eta abar.
5) **RR**. Hau ere, R gogorra alegia, bakarra da: AR, ER, IR, OR, UR; RRA, RRE, RRI, RRO, RRU; eta abar.

6) **S-Z-X**. Hirukote hau familia dugu. Elkarren kideak dira: SA-XA-ZA; SE-XE-ZE; SI-XI-ZI; SO-XO-ZO; SU-XU-ZU; AS-AX-AZ; ES-EX-EZ; eta abar.
7) **TS-TX-TZ**. Hemen hots indartsu hauen familia osatzen dugu: ATS-ATX-ATZ, ETS-ETX-ETZ; ITS-ITX-ITZ; OTS-OTX-OTZ; UTS-UTX-UTZ; TSA-TXA-TZA; TSE-TXE-TZE; eta abar.
8) **DIPTONGOAK**. Sail nagusi honetan diptongo guztiak datoz: EA, IA, OA, UA; AE, EE, IE, OE, UE; AI, EI, OI, UI; AO, EO, IO, UO; AU, EU, IU, OU.
9) **BESTE BATZUK**. Sail honetan errima mota batzu bereziki ematen dira, oso erabiliak izanik, tokatzen zitzaien sailean, hirugarrenean alegia, zehazterik ez zegoelako. Hauexek dira: NIK, RIK, RRIK, LIK, SIK-ZIK, TSIK-TZIK. Errima hauen oinarri nagusia, ia osoa, atzizki bat da: IK: Ez du bariazio handirik ematen. Baina oso erabiliak eta erabilgarriak izanik, daukaten apurretik ahal den guztia garatzea ez dago gaizki.

## SAILTXOEN SAILKAPENA

Sail nagusien eta horien barruko sailtxoen berri emanik, bada beste sailkapen garrantzitsu bat sailtxo bakoitzaren barruan. Sailtxo hauek honako azpisailen arabera banaturik daude:

1) ADITZA
   a) Aditz jokatua
   b) Aditzak
   c) Aditz bikoitzak
   d) Era intenporala
2) ADBERBIOAK
3) IZENORDEAK
4) ADJETIBOAK
5) IZENAK
6) ATZIZKIAK

Hitz batek hauetariko bat izan behar du nahitaez. Banakuntza honen azalpen luzea HITZAREN KIROL NAZIONALEAN dator. Hemen aski da honela banaturik dagoela jakitea. Aditzak lau azpisail ditu. Azpisail hauek zenbakiz bakarrik adierazten dira. Lau bakarrik dira eta zenbaki bakoitzari zein dagokion gogoan hartzea ez da lan zaila. Bestela, sei sail handi horiek izendaturik datoz beti.

Sail hauek ez dute esan nahi errima bakoitzak denak eduki behar dituenik. Sail posibleak dira. Besterik da errima bakoitzak hauetariko zenbat dituen. Gutxik daukate denetik. Gehienek batzutatik daukate eta badira gutxi-

tatik daukatenak. Errima batzuk bariazio gehiago eta beste batzuk gutxiago daukate. Sail bat harturik ere, adjetiboak adibidez, hortik badaukaten errimek ez daukate denek berdin. Batzuk adjetibo bat edo beste dutelarik, beste batzu ugariagoak dira. Hitz batez, errima batetik bestera alde handia dago sail hauetan eta sail bakoitzaren ugaritasunean.

Azkenik, bada sailtxo bat tarteka agertzen dena: BIZKAIERA. Bertsolaritzan hitz eta aditz forma asko dira, euskalki bakoitzak bereak dituenak. Nik, bizkaitarra izanik, neure euskalkikoak sartu ditut. Beste euskalkietakoek bila bezate sail horretan berei dagokiena.

# B - D - G - R

## BA-DA-GA-RA

### A

1) a. Gara, zara, da (bada, bera da, gaba da)
   b. Laga, atara.
   c. Ikara, dardara, susara (izan-ukan), algara, eupada, kakara, karkara, marmara (egin)
   d. Laga, paga, graba, traga, akaba, ezaba.
   Para, anpara, konpara, prepara, errepara.

2) Hara, baga, bada, jada, beharbada, baitezpada.
   Mara-mara, firi-fara, ziri-zara.
   Jaja, iji-aja, ajaja, afa, plafa.

4) Nomada, susara.

5) Haga, gaba, baba, paga, traba, draga, plaga, aldaba, indaba, silaba, sigi-saga.
   Armada, balada, galtzada, granada, parada, patxada, errada, ilada, triada, brigada, bolada, pomada, asanblada, enbaxada, marmelada, entsalada, alborada.
   Gara, bara, algara, antzara, ganbara, lanpara, manpara, galdara, kakara, karkara, marmara, dardara, maskara, enara, erdara, euskara, ijara, ilara, bailara, izara, ikara, kikara, zirrara, otzara, udara, antepara.
   Baja, maja, alaja, maraja, bentaja, bafa, estafa, jirafa, mustafa.
   Atxaga, Guevara, Arriaga, Leizarraga, Zuloaga.
   Araba, Aiara, Ankara, Kanada, Praga, Sahara, Iliada.

6)
*RA:* Askara, plazara, azokara, martxara, errekara, erronkara.
Afrikara, Txinara, Amerikara, Baionara.
*RA-(K)ARA:* Ahalara, erara, nahikara, gogara, desgogara.
*ABA:* Alaba, asaba, osaba, ugazaba.
*ADA-KADA:* 1. Pasada, sakada, hegada, zertzelada, islada, zirrada, okada, eupada, taupada, bultzada, abiada, begirada.

Bafada, arrapalada, astrapalada, olinpiada, danborrada, estropada, gurutzada, maskarada, matxinada.
2. Betekada, botakada, tirakada, besarkada.
3. Zaplada, zartada, adarkada, eztenkada, zirikada, horzkada, bihozkada, haginkada, harrikada, ostikada.
4. Tripakada, trenkada, ahokada, eskukada.

*TARA:* 1. Hartara, hortara, bertara, zertara, ezertara, edozertara.
2. Urteetara, gizonetara, herrietara, hauetara.
3. Askotara, eratara, modutara, urtetara.
4. Honetara, horretara, bestetara, zeharretara, trabesetara, okerretara, iruntzietara-iduleztara.

*TADA:* Zigortada, bakartada, egitada.

*KARA:* 1. Belzkara, hozkara, lurkara, zurikara, gaztainkara, burdinkara.
2. Arkara, katakara.

*IKARA:* Izuikara, hotzikara, lurrikara, buztanikara.

*E=A:* Laba, sara, bara, baga, haga, altara, titara, landara, koilara, eskuara.

*A: (Fem)* Barbara, pikara.

## E

1) a. Gera, zera, da (hobe da, ote da, lege da, bete da)
b. Atera.
d. Heda, hega, plega, enplega, arnega, ernega, ailega, sosega. Gera, entera, opera, modera.

2) Batera, bat-batera, behera (gainbehera, gora-behera, bertan behera, buruz behera), arabera, atzera, antzera, gainera, ostera, sobera, aurrera, hurrera, ex cathedra.

3) Bera, bedera, berbera, norbera.

4) Bera, gelbera, kupera, alegera, artega.

5) Neba, sega, seda, ziega, greba, algebra, katedra, anega, arreba, amaaitaginarreba, izeba, entrega, lekeda, omega, kolega, estratega.
Era, lera, xera, afera, armera, baxera, arpilera, jaiera, albufera, atmosfera, biosfera, estratosfera, kadera, kamera, bandera, ganbera, hegabera, kantera, pantera, tankera, barrera, karrera, kartera, aukera, makera, manera, mangera, habanera, kanabera, katadera, primadera, egutera, esfera, bezpera, euskera, xedera, egutera, libera, litera, eihera, kimera, zimera, bisera, trangadera, eskailera, opera, kolera, tobera, txopera, ultzera.
Eba, Ageda, Ribera, Veda.
Erribera, Andromeda, Tutera.

6)

*RA:* 1. Kalera, larrera, etxera, ohera, hobera, lorera, gurera, urtera.
2. Parera, legera, denera, kolpera, ustera, luzera.

*ERA:* 1. Galera, galdera, esaera, gertaera, akabera, bilera, ibilera, joera, egoera, ezaguera.
Harrera, jarrera, sarrera, sorrera, erorrera, etorrera.
2. Azalera, zabalera, lodiera, sendoera, luzera.
*KERA:* 1. Kantakera, antolakera, pentsakera, azterkera, jazkera, orrazkera, sineskera, ikuskera, kontakera.
2. Tripakera, begikera, aurpegikera, gorpuzkera, burukera, muturkera.
3. Albokera, aurrekera, atzekera, zeharkera, okerkera, trabeskera.
4. Arkera, katakera.
*BERA:* 1. Irribera, minbera, suminbera, egarbera, haserbera, izerbera, bihozbera, onbera, hozpera, egosbera.
2. Gaztanbera, kardabera, kanabera, hegabera, haginbera, eulbera.
*BEHERA:* Hilbehera, haizebehera, aldasbehera, itsasbehera, urbehera.
*PEDA:* Ortopeda,
*A:* Zera, papera, platera, plazera, alogera.
*E = A:* Heda (hede).
*A:(fem)* Saltsera, borrera, gailega, sakrilega, pastelera.

## I

1) a. Dira, gira, zira, balira, da (ari da, eri da, nabari da, bizi da, aski da).
b. Gupida, desira (izan-ukan).
d. Fida, gida, gupida, gatiba, gaztiga, deskriba. Tira, desira, erretira.
2) Aida, biba, tira, begira, sikira, jira eta bira.
4) Biga.
5) Brida, libra, liga, ziba, sigla, gida, partida, deriba, oliba, lixiba, intriga, gupida, labatiba, albondiga, diapositiba.
Ira, hira, jira, bira, lira, mira, tira, satira, kadira, jirabira, tirabira, sokatira, aingira, aintzira, bigira, dirdira, kirkira, pilpira, desira, izkira, mizpira, distira, zingira, lastaira, eskuaira, mintzaira, kondaira, ikusmira, lurbira.
Zifra, kalifa, tarifa, errifa.
Altamira, Eneida, Ira, Atlantida.
Txillida.
6)
*A:* Sherifa, esnifa.
*RA:* 1. Herrira, berrira, handira, argira, mendira. Kantaurira, Basaurira, Napolira, Miamira.
2. Harira, erdira, neurrira, guztira, gutxira.
*DA:* Segida, korrida, mugida, despedida.
*IBA:* Narratiba, alternatiba, perspektiba, defentsiba, ofentsiba, esklusiba, exekutiba, kooperatiba.

*ZIDA:* Herbizida, homizida, genozida, jainkozida, suizida, fratrizida, insektizida.
*A (fem):* Pasiba, obsesiba, posesiba, perfida, kerida, selektiba, primitiba.

## O

1) a. Da (ondo da, igaro da, egongo da, espero da, igo da)
d. Froga, proba, aproba, konproba. Ora, lora, zora, adora, labora, birlora, deitora.

2) Gora, nora, inora, edonora, albora, ondora, kanpora, lekora, gustora, boga-boga.

4) Alproja.

5) Koba, kobla, joga, noba, toga, troba, supernoba, aproba, adoba, antxoba, sinagoga, ziaboga, iloba.
Oda, moda, soda, arroda, pagoda, rapsoda, komoda.
Froga, droga.
Moja, sofa, soja, alkatxofa.
Flora, agora, ganora, alkandora, anfora, anafora, aurora, mandragora, metafora, mejora, nekora, denbora, haizkora, txirlora, bitakora, polbora, deihagora, heiagora, diaspora.
Pandora, Jehova,
Zamora, Cordoba, Terranoba.
Sofa, moja, alproja.

6)
*RA:* 1. Ahora, arlora, lepora, zepora, linbora, golkora. Bilbora, Mexikora, Kaukasora, Parnasora, Olinpora.
2. Orora, osora, gogora, gerora, luzarora.
*PODA:* Antipoda,
*GORA:* Hasgora, aldasgora, hilgora.
*A:* Ora, artzanora.
*E=A:* Lora, hoba, serora, bapora, traktora.
*A: (Fem)* Autora, desertora, doktora, eskultora, monitora, priora, tutora.

## U

1) a. Da (heldu da, seguru da, hustu da, gertatu da)
c. Gura (izan-ukan), ardura (izan-ukan), logura (izan).
d. Duda, muda, apura, ingura, lilura, satura, kontura, jura, inaugura.

2) Ardura, pentzura, modura, kontura.

3) Hura.

5) Uda, duda, guda, muda, fuga, tuba, muga, helmuga, jomuga.
Aura, akura, ardura, aztura, arrengura, aingura, jaidura, onura, padura, mentura, zentsura, abentura, kalentura, itxura, matxura, figura, mihura, lilura, natura, durdura, purpura, miniatura, postura, koiuntura.
Buda, Cernuda.
Kuba, Extremadura.

Trufa.

6)

*RA:* 1. Zakura, lekura, zerura, burura, ifernura, eskura.
Malibura, Candanchura, Perura.
2. Barrura, tentura, zentzura, pultsura, puntura, eredura, gordegaldura.

*DURA-TURA:* 1. Hildura, mindura, samindura, apaindura, ubeldura zimurdura, berdura, aladura, abiadura, akidura, inbestidura.
Estura, freskura, tristura, tolestura, joskura, haustura.
Batura, deitura, egitura, bahitura, lotura, bilkura, juntura. Klausura, fisura.
2. Kultura, tesitura, tenperatua, diktadura, karikatura, obertura, partitura, arkitektura, eskultura, estruktura, literatura, pintura, konfitura.

*GURA:* 1. Ikusgura, jakingura, agergura, handigura, dirugura.
2. Hazkura, pizgura, esangura, negargura, barregura, logura.

A: Ura, zura, gazura, itzaizura.

*E=A:* Suga, herensuga, agura.

## LBA-LDA-LGA:

1) a. Da (ahal da, zabal da, hil da, ahul da)
d. Alda, galda, salba, asalda, asolba, olga, golda, molda.

5) Alba, alda, aldra, alfa, alga, galda (eguzki galda), falda, galga, malda, salda, porrusalda, zamalda, esmeralda, sorbalda.
Selba, azelga, huelga.
Filda, pilda.
Golda, zolda.
Bulda.
Mafalda, Isolda.
Garralda.

6)

*DA:* Hilda.

*GA:* Afalga, estalga, helga.

## NBA-NDA-NGA

1) a. Da (joan da, hemen da, ezin da, on da, ezagun da)
c. Eztanda, zaunga, zurrunga (egin).
d. Landa, senda, defenda, izenda, sostenga, honda, funda.

2) Landa, danba, danga, dzanga, dinbi-danba, tanga, tenga, tenga-tenga, arin-aringa.

4) Milinga.

5) Andra, banda, danda, ganba, ganga, langa, landa, panda, samba, tanga, tranga, txanda, txaranga, amanda, baranda, parranda, garranga, baztanga, eztanda, demanda, propaganda. Laranja.
Enda, denda, prenda, benda, menda, xenda, abenda, agenda, almendra, harenga, balenga, belenda, legenda, zerrenda, prebenda, hazienda, ofrenda.
Ginda, pinda, txinga, marinba, dilinda, firrinda, xiringa, txirringa, belatxinga. Linfa.
Onda, fonda, ondra, bonba, tonba, sonda, alfonbra, anakonda, erronda, ezponda. Lonja.
Dunba, jungla, tunda, txunba, maunga, zaunga, sunda, xunda, zunda, tunba, buhunda, durunda, bulunba, burrunda, furrunda, zurrunga, birunda, katakunba.
Zeelanda, Irlanda, Holanda, Uganda.

6)
*DA:* Janda, irtenda, eginda, egonda, entzunda.
*GA:* Donga, ezkonga.
*ANGA:* Besanga, ezkanda, haizkanda, oilanda, luzanga, luzenga.
*A:(fem)* Linda, gringa, ninfa, sainda, bikinga, fandanga, katxonda.

## RBA-RDA-RGA

1) a. Da (behar da, zer da, nor da, gaur da).
c. Narda (ukan), berba, burla (egin).
d. Karga, larga, borda, burla, purga, enbarga, enkarga, konserba.

2) Barda.

5) Garba, karga, barda, larba, goarda, narda, sarda, matxarda, beltxarga, deskarga, bonbarda, mustarda.
Berba, berga, zerba, zerga, gerla, erreserba, konserba.
Lingirda.
Orga, borda, horda, korda, morda, klabikorda, txirikorda.
Burla, kurba, purga, lanxurda.
Minerva.

6)
*GA:* Indarga, eskerga, itxurga, kolorga.

## BE-DE-GE-RE

### A

1) a. Gare, zare, dare.
c. Erabe (izan).

2) Be (inora be), gabe, bage, are, pare, badare.

4) Jabe, grabe, erabe, dulabre, suabe, burujabe, bare, nare.
Gale, zale, jale (ikus LE).
5) Habe, hage, bahe, labe, nabe, sable, klabe, konklabe, abade, arabe, galbahe, xarabe, edabe, erabe, nerabe, enbrage, enklabe, zetabe, mirabe, kofrade, zutabe.
Are, eskuare, bare, jare, kare, sare, zare, aldare, kapare, landare, glaziare, ditare, pilare, zizare, joare, dolare, ondare, koilare, juglare.
Bahe, galbahe, kanpae, gaztae (ikus AE).
Aje, kafe, bafle, garaje, paraje, epigrafe.
Javhe, Etxepare.
6)
*DE:* Garade, zarade, dirade.
*BE:* Zankabe, haizabe, etxabe, urkabe.
*BLE:* Estable, miserable, probable.
*GE:* Erage, lotsage.
*AJE:* Adaje, ilaje, lumaje, masaje, paisaje, txantaje, biraje, blindaje, sabotaje, kamuflaje.
*GABE:* 1. Dohakabe, lotsagabe, moldagabe, axolagabe, paregabe, bidegabe.
2. Atsekabe, nahigabe, ustekabe, bidegabe, zorikabe.
*TADE:* 1. Egitade, bakartade, gogortade.
2. Edade, sanidade, abildade, libertade, kalamidade.
*GALE:* Logale, pizgale, okagale, botagale. (Ikus LE)
*ZALE:* Janzale, ibilzale, diruzale. (Ikus LE)

Bizkaiera: Habe, dabe, nabe.

## E

2) Ere, bere, halere, batere, badere, bedere, betiere, behinere, alafede, be (gorde be), jeje.
4) Bere, nere.
Trebe, xehe, zehe, mehe, xelebre, alegre.
5) Hede, fede, lege, xede, mesede, errege, reggae, erliebe, gizalege.
Ehe, behe (ikus EE).
Ele, bele (ikus LE).
Abere, andere, ampere, behere, betiere, botere, karaktere, miserere.
Jefe, hereje.

Bizkaiera: Ezebe, balebe.

## I

1) a. Dire.
2) Bide (hori dela bide), be (hori be, niri be), sine die.
4) Hire, nire.

Ide, kide, libre, zelibe.

5) Bide, lige, pibe, detektibe, altzifre, kalibre, jengibre, geide, fraide, abside, apside, tiroide, unide, efemeride, aire, maindire.
Rifle, arrezife.
Munibe, Olabide, Uztapide.
Uribe, Karibe, Zaire.

6)

*BLE:* Faktible, terrible, sensible, bisible, fusible, posible, inposible, inpasible.

*IDE-KIDE:* Ahaide, partaide, ohaide, lankide, herkide, senide, haurride, bidaide, aberkide, adiskide, saminkide.

*BIDE-PIDE:*
1. Erabide, eskabide, errebide, adibide, aginpide, ibilpide, bizipide, etorbide, ezagupide.
2. Lanbide, zeharbide, errepide, erdibide, ogibide, gurpide, eskubide, burubide.

*OIDE:* Alkaloide, paranoide, zeluloide, kristaloide, metaloide.

*AIRE:* Besaire, gerraire, buruaire.

Bizkaiera: Leuskide, leikide, zeinkide, daikide.

## O

1) c. Amore (eman), deitore (egin).
2) Be (ondo be), re (gero`re, bero`re), lekore.
4) Hobe, flore, more, dotore.
Doble, noble, probe.
5) Ohe, kode, tripode, ore, lore, azalore, babalore, pasadoble, adore, labore, balore, fabore, faktore, bapore, zapore, aztore, kastore, endore, errore, tenore, ohore, ondore, dolore, kolore, folklore, umore, tumore, deitore, sektore, bitore, likore, priore, motore, bastidore, erretore, aligatore.
Katastrofe, kofre.
Poe, Tagore.

6)

*DORE-TORE:* Aktore, traktore, pastore, bektore, gestore, doktore, detektore, autore, editore, emisore, sentsore, konfesore, auditore, salbatore, traidore, desertore, errektore, erreaktore, diktadore, trobadore, gobernadore, inkinadore, direktore, pintore, tutore, injektore, inspektore, objektore, eskultore, induktore, monitore.

## U

1) a. Gaude, zaude, daude, beude, baleude.
4) Neure, heure, zure, zeure, gure, geure.

5) Aube, musde, suge, herensuge, pure, agure, augure, aitagure, ainube, inude, ingude, orube, erbinude.
Juje, soufflé, entxufe.

6)
*TUDE:* Anplitude, altitude, latitude, longitude, magnitude.
*GE:* Erruge, buruge, diruge.
*BLE:* Soluble, insoluble, indisoluble.

## LBE-LDE-LGE

1) c. Alde, galde (egin), ahalge (izan).
2) Alde, balde, debalde, bestalde, alderik alde, be (ahal be).
4) Errebelde.
5) Alde, balbe, galde, talde, ahalge, salbe, erralde, kokalde, bilbe, olde, golde, molde, uholde.
Elizalde, Olalde.

6)
*BE:* Estalbe, haizalbe, itzalbe.
*(T)ALDE:* 1. Artalde, behialde, haurralde.
2. Etxalde, haizalde, sukalde, elizalde, arratsalde, goizalde, eskualde.
Sartalde, sortalde, ekialde, mendebalde, iparralde, hegoalde.

## NBE-NDE-NGE

1) a. Bageunde, bazeunde.
2) Mende, mendez mende, eskumende, errekonde, be (han be, inon be).
4) Mendre, donge.
5) Andre, igande, alanbre, kalanbre, jende, mende, merenge, laringe, esfinge, lonbre, konde, hekatonbe.
Mirande.

6)
*BE:* Barrunbe, gainbe, ilunbe.
*GE:* Ezkonge, konponge.
*KONDE:* Bikonde, hirukonde, laukonde.
*KUNDE:* Erakunde, jazarkunde, aiherkunde, nahikunde, ongunde, igokunde, jasokunde.

## RBE-RDE-RGE

1) b. Gorde.
2) Be (hor be, behar be).

4) Berde.
5) Alarde, sarde, galtzarbe, matxarde, lerde, orde, korde, akorde, batzorde, ailorbe, oinorde, urde, gurbe, basurde, izurde.
Cabo Verde.
6)
*BE:* Uztarbe, aterbe, lehorbe.
*GE:* Indarge, kolorge, itxurge.
*ORDE:* Amorde, aitorde, alaborde, urreorde, ileorde.

## BI-DI-GI-RI

SIL.BAK.: Hi, bi: bala bi, ele bi, ero bi, buru bi.
Hara hi, haute hi, hago hi.

### A

1) a. Banadi, bahadi, badadi, hadi.
b. Ezari.
c. Agi, ari, nabari (izan), igari (egin).
d. Adi, kabi.
2) Adi, igari.
3) Hari, berari, norberari.
4) Nagi, nabari, hamabi, afrikari, ernari, ugari.
5) Habi, kabi, haragi, garabi, zahagi, abizari, argizagi, buruzagi.
Hari, gari, sari, ahari, afari, altzari, arnari, atari, madari, patari, safari, zamari, arrankari, xaribari, mirari, nekazari, argizari, ingeniari.
Mari, Hamurabi.
Euskadi, Cagliari.
6)
*RI:* 1. Etxeari, argiari, gizonari.
2. Erari, dudari, sortari (mugagabea).
*(L-T)ARI:* 1. Azterlari, salatari, pentsalari, ikaslari, gidari, agintari.
2. Dantzari, kantari, parrandari, zelatari, gerlari, merkatari, bekatari, aintzindari, albaitari, pasaiari, ehiztari, zerbitzari, errotari, gudari, burrukari.
3. Segalari, haizkolari, soinulari, oihulari, probalari.
*(K)ARI:* 1. Janari, bazkari, edari, gertakari, nahikari, bizikari, hobari, opari, gosari, bozkari, lotsari, gurari.
2. Adarkari, erpekari, ostikari, muturkari.
3. Andrekari, etxekari, emaztekari, gizonkari, haundikari.
*KETARI:* Urketari, egurketari, andreketari.
*DI:* 1. Artadi, pinadi, otadi, arantzadi.
2. Izadi, gizadi.

*IA = I:* Notari, komisari.

Bizkaiera: Jagi, ebagi, erabagi.
Banagi, bahagi, badagi.

**E**

1) a. Bedi, baledi, ailedi.
b. Eseri, eskegi.
c. Ageri, ateri, zilegi (izan), igeri, usegi (egin).
d. Segi, obedi, despedi.

2) Ageri, ateri, larregi, gehiegi, gutxiegi, beren beregi.

3) Neri, zueri, haieri, hoieri.

4) Eri, ageri, ateri, heavy, beilegi, zilegi, orlegi.

5) Egi, hegi, begi, abegi, adabegi, marabedi, usegi, aurpegi, alegi, jauregi, ikuspegi, izterbegi.
Eri, ateri, azeri, ihauteri.
Valery, Labegerie, Salieri, Montgomery, Kennedy, Retegi, Txillardegi, Zumalakarregi.

6)

*RI:* 1. Zeri, edozeri, hainbesteri.
2. Etxeri, besteri, legeri, jenderi.
3. Etxeeri, gizoneri, deneri.

*EGI:* Onegi, maizegi, goizegi, beteegi, ederregi, maiteegi.

*(T)EGI:* Lantegi, hiltegi, hiztegi, biltegi, mintegi, auzitegi, egutegi, oilategi, monastegi, anbulategi. Ardandegi, amildegi, alondegi, presondegi.

*(K)ERI:* Alferreri, zirineri, zirtzileri, lapurreri, mozkorreri, zitaleri.
Haurkeri, huskeri, handikeri, tentelkeri, zurikeri.

*(T)ERI:* Gazteri, gizateri, umeteri, abelteri, luperi.

*DI:* Artedi, legedi, loredi.

*IA = I:* Arteri, bateri, aberi, histeri, miseri, tragedi, komedi, entziklopedi.

Bizkaiera: Begi, balegi, ailegi.
Edegi.

**I**

1) c. Agiri (izan), intziri (egin).
d. Higi, frigi, errezibi.

2) Firi-firi, miri-miri, txiri-txiri, ziri-ziri.

3) Niri, hiri, biri.

4) Giri, agiri, mutiri, firifiri.

5) Ibi, idi, kiwi, hiri, biri, txiri, ziri, aldiri, martiri, intziri, suziri, arrastiri, hara-kiri, zirimiri, izkirimiri.
Ihi, bihi, mihi (ikus II).

6)
*RI:* Hordiri, zuriri, Mariri.
*DI:* Anaidi, mendidi, ontzidi, urkidi.
*IA = I:* Walkiri, inbidi, insidi.

## O

1) a. Tori.
b. Erori.
c. Ohi (izan-ukan), sori (izan).
d. Ohi, mogi.
2) A priori, a posteriori.
3) Hori, berori, herori, zerori.
4) Ori, gori, jori, sori, lohi, lodi, zogi, grogi.
5) Ogi, hobi, hobby, lobby, jogi, hodi, body, zohi, zori, txori, maori, gautxori, teori, histori, klitori.
6)
*RI:* 1. Nori, inori, edonori, askori, denori.
2. Mandori, tontori, zorori.
*DI:* Arlodi, garodi, pagodi.
*HOBI:* Harrobi, karobi, hilobi.
*ZORI:* Galzori, hilzori, itozori.
*IA = I:* Kalori, histori, teori, kategori, filosofi, biologi, teologi, zoologi.

## U

1) a. Dirudi, balirudi, banirudi.
b. Isuri, itzuri.
d. Mugi, irudi.
4) Guri, zuri, beltzuri, limuri, linburi, urduri, elezuri, adiguri.
5) Ludi, irudi, suhi, zubi, zurubi, rugby, arrubi, marrubi, errubi, eskubi.
Huri, euri, zauri, ainuri, akuri, axuri, iduri, aldauri, zinkuri, uhuri, dunduri, maskuri, bisturi, justuri, baratxuri.
Kantauri, Neguri, Canterbury.
6)
*RI:* 1. Guri, zuri.
2. Bururi, konturi, ereduri, Peruri, pinuri.
*DI:* Araudi, pinudi, porrudi.
*DURI-TURI:* 1. Apainduri, jakinduri.
2. Hogenduri, solasturi.
*IA = I:* Penuri.

## LBI-LDI-LGI

1) b. Jalgi, eralgi.
2) Aspaldi, aldiz aldi, geldi.
4) Geldi.
5) Aldi, zaldi, ahapaldi, errebeldi, eguraldi.
Vivaldi, Garibaldi.
6)
*DI:* Arbeldi, zabaldi, ezpeldi.
*ALDI:* Esaldi, nekaldi, hitzaldi, gizaldi, umaldi, belaunaldi, ikusaldi.

## NBI-NDI-NGI

1) a. Banendi, bahendi, ainendi, aihendi.
b. Iraungi.
d. Gaindi, txundi, errendi, defendi, konfondi.
2) Ongi, gaindi, haraindi.
4) Handi, dandy.
5) Dandy, arrandi, sendi, mendi, sumendi, ilendi, berendi, durundi.
Gandi, Larramendi.
Auñamendi.
6)
*DI:* Arrendi, izendi, asundi.
*MENDI:* Itomendi, itsumendi, hondamendi, urkamendi.
*HAUNDI:* Buruhaundi, tripaundi, gibelaundi.

Bizkaiera: Banengi, bahengi, ainengi, aihengi.

## RBI-RDI-RGI

1) b. Jargi.
c. Argi (egin).
2) Biderdi, erdiz erdi, gaitz erdi.
4) Argi, garbi, erdi, hordi.
5) Arbi, argi, erbi, derby, ilargi, oskarbi, zohargi, uztargi, ipurtargi.
Ardi, ahardi, erbi, erdi, alderdi, galtzerdi, gaitzerdi, eguerdi, izerdi, gurdi, ipurdi, bururdi.
Lizardi.
Lapurdi, Zugarramurdi.
6)
*DI:* Saskardi, lizardi, lerdi, alordi, lehordi, ezkurdi.

# BO-DO-GO-RO

## A

1) a. Nago, hago, dago.
b. Jo (bera jo, jo ta jo) igaro, itxaro(n).
2) Akabo, asago, ordago, lehenago, gehiago, gutxiago.
4) Babo, brabo, esklabo.
Klaro, naro, nabaro, arraro, barbaro, pikaro, oparo.
Gajo, gizajo.
5) Aho, bago, mago, pago, trago, arrago, zentabo, biago, tornado, lunbago, kartilago, sarkofago, pielago, artxipielago.
Haro, garo, abaro, akaro, anparo, hazaro, berbaro, erreparo, tupamaro.
Majo, gajo, gizajo, Navajo.
Machado, Ikaro, Pindaro, Santiago, Lopez de Haro, Alexandro.
Kartago, Tartaro, Izaro, Chicago.
6)
*AGO:* Honago, onago, harago, txarrago, gizonago, okerrago, nahiago.
*RO:* 1. Zeharo, oparo, luzaro.
2. Egunaro, urtaro, udaro, domekaro.
*(Z)ARO:* Haurtzaro, egotaro, zahartzaro, udaro, urtaro, uztaro.
*PARO:* Bibiparo, obiparo.
*GRAFO:* Agrafo, telegrafo, poligrafo, boligrafo, biografo.

## E

1) a. Bego, balego.
b. Jo, eho, espero.
2) Edo, gero, allegro, gaurgero, ezkero, harrezkero, honezkero.
4) Ero, bero, aptero, diamero, gailego, sakrilego, konifero.
5) Hego, lego, zebo, kredo, allegro, torpedo, bulego, errelebo.
Bero, klero, mero, zero, suero, bezero, aiero, pandero, jenero, libero, obrero, bolero, borrero, trobero, numero, kruzero, olentzero, albaitero, desespero, delibero, presbitero, akuifero, polimero, erromero, karabinero, errinozero.
Homero, Quevedo, Espartero, Samaniego.
Ebro, Fitero, Toledo, Sarajevo.
6)
*GO:* Jabego, luzego, kidego, frailego.
*RO:* 1. Astero, hilero, urtero, egunero.
2. Luzero, betero, xehero, suabero.
*ERO:* Saltsero, parrandero, litxarrero, gartzelero.
*PEDO:* Bipedo, koadrupedo.

## I

1) b. Jo, igo.
c. Fido (izan).
2) Astiro, berriro, in vivo.
4) Iro, txiro, txairo, algido, arido, perfido, hibrido, likido, solido, fluido, libro, altibo, furtibo. Pijo.
5) Zibo, artxibo, estribo, olibo, motibo, kultibo, korrektibo, aperitibo, dispositibo.
Latigo, bertigo.
Kodigo, laido, enbido, libido, likido, solido, fluido.
Grifo, apokrifo.
Giro, tiro, banpiro, papiro, zafiro, guajiro, gaingiro, zikiro, erretiro.
Miro, Ziro, Sisifo.
Alkairo, Tiro.
6)
*GO:* Etsaigo, begigo, lodigo, haundigo.
*RO:* 1. Handiro, argiro, garbiro, geldiro, betiro, biziro, hordiro.
2. Aldiro, orduerdiro.
*KIRO:* Egiazkiro, bigunkiro, samurkiro.
*IBO:* Aktibo, efektibo, defektibo, selektibo, objektibo, kolektibo, subjektibo, deduktibo, induktibo, produktibo.
Datibo, natibo, narratibo, erlatibo, negatibo, bokatibo, adjetibo, prebentibo, primitibo, positibo, nutritibo, paliatibo, indikatibo, superlatibo, exekutibo.
Masibo, pasibo, intensibo, obsesibo, posesibo, permisibo, korrosibo, esklusibo.
*IDO:* 1. Azido, oxido, anhidrido,
2. Araknido, bobido, korbido, hominido, lemurido.

## O

1) b. Idoro.
c. Gogo (ukan).
2) Oro, haboro, osotoro, grosso modo.
4) Oro, zoro, burtzoro, bobo.
5) Gogo, globo, algarrobo, godo, nodo, anodo, katodo, metodo, eksodo, sinodo, elektrodo, periodo, bisigodo, ostrogodo, apostrofo.
Loro, kloro, poro, soro, foro, aforo, semaforo, meteoro, txikoro, fosforo, burtzoro. Torlojo.
6)
*GO:* 1. Egunoro, hiloro, urteoro, asteoro.
2. Osoro, gozoro.

*LOGO:* 1. Dekalogo, katalogo, prologo, epilogo.
2. Teologo, filologo, biologo, zoologo, homologo, arkeologo, ginekologo.

*SOFO:* Filosofo, teosofo.

*BORO:* Karniboro, herbiboro, omniboro.

*PODO:* Artropodo, miriapodo.

*FOBO:* Xenofobo, hidrofobo, klaustrofobo.

## U

2) Agudo.

5) Kubo, tubo, judo, laudo, feudo, apuro, bromuro, konjuro, minotauro.
Arturo, Epikuro, Victor Hugo.
Lugo.

6)

*GO:* Ordugo, burugo, maisugo.

*RO:* Orduro, zapaturo, segunduro, minuturo.

# LBO-LDO-LGO

1) c. Albo (utzi, geratu), zerraldo (utzi), salbo (izan).

2) Salbo.

4) Geldo.

5) Albo, baldo, paldo, saldo, ildo, erraldo, zerraldo, ziraldo.
Bilbo, Barakaldo.

6)

*GO:* 1. Ahalgo, hilgo.
2. Babelgo, Madrilgo, Errezilgo.
3. Ahalgo, zabalgo, epelgo, ustelgo, ahulgo.

# NBO-NDO-NGO

1) a. Banengo, bahengo.

2) Ondo, egundo, lehenengo, hurrengo, in crescendo.

4) Lanbo, lanbro, sendo, zindo, koxkondo.

5) Lando, mando, mango, tango, trango, txango, zango, xardango, fandango, komando, meandro, abakando, agilando, kontrabando, accelerando, andafandango.
Crescendo, dibidendo, diminuendo.
Bingo, gringo, linbo, txinbo, ninbo, ninfo, paraninfo, tamarindo, bikingo, tilingo, zilindro, gorringo, marigorringo, zuringo.

Ondo, hondo, fondo, ontto, bonbo, bionbo, tongo, tonbo, estrongo, diptongo, mondrongo, zokondo.
Jumbo, segundo, nibelungo.
Marlon Brando, Rimbaud.

6)

*GO:* 1. Izango, irtengo, jakingo, egongo, entzungo.
2. Hango, hemengo, behingo, inongo, inungo.
Puntarengo, azkenengo, aurrenengo, beherengo, gorengo, ondorengo.
3. Gehiengo, gutxiengo, hargingo, artzaingo, zurgingo.

*NGO:* Luzango, berdingo.

*ONDO:* 1. Sagarrondo, gaztainondo.
2. Besondo, betondo, ukondo, ukalondo, garondo, sutondo, belarrondo.
3. Jatondo, afalondo, hilondo, erdiondo, gerrondo.

*KONDO:* Okondo, umekondo, etxekondo, mutilkondo, agurekondo.

## RBO-RDO-RGO

4) Mardo, lerdo, txordo, absurdo.

5) Ardo, dardo, margo, herdo, mordo, morbo, turbo, sagardo, garagardo, zapardo, gepardo, petardo, golardo, txanbergo, mokordo.

6)

*GO:* Ihargo, uztargo, edergo, alfergo, lidergo.

*DO:* Bizardo, ugerdo.

*(T)URGO:* Demiurgo, dramaturgo, taumaturgo.

*MORFO:* Amorfo, halomorfo, isomorfo, polimorfo.

## BU-DU-GU-RU

SIL.BAK.: Du, gu. (Badu, hobe du, ari du... Gara gu, gaude gu, gaitu gu...)

### A

1) a. Daukagu, daramagu, diagu, zioagu.
b. Baru (egin), anparu (eman).

4) Laru, karu, klaru, enparadu, koitadu, ondradu, esklabu.

5) Tabu, kabu, akabu, adabu, marabu, enpagu, deabru, deskalabru.
Adu, gradu, ganadu, tabladu, estadu, donadu, mokadu, soldadu, errekadu, abogadu.
Sagu, zabu, pagu, palagu.
Baru, anparu.
Tupac Amaru.

*O=U:* Tragu, arragu, arraru, barbaru.

Bizkaiera: Dautsagu, dauagu, daroagu.

## E

1) a. Degu, diegu, dukegu, dizuegu, zaituztegu.
Dezakegu, zaitzakegu, daramakegu.
c. Erregu, aieru (egin), sosegu (ukan).
4) Lukurreru.
5) Dedu, eredu, endredu.
Debru, negu, zebu, plegu, arnegu, ernegu, erregu, enplegu, entregu, entsegu, eztegu, entelegu, mailegu, sosegu.
Keru, zeru, aieru, aingeru, gaitzeru, traineru, barberu, mesmeru, borreru, albaiteru, injineru.
Peru.
6)
*GU:* Laketgu, gordegu, erregu.
*O=U:* Saltseru, porteru, taberneru, bezeru, obreru.
Bulegu, errelebu, sakrilegu.

Bizkaiera: Dautsegu, dautzuegu, dagiegu, daikiegu.

## I

1) a. Digu, baligu, zaigu, zaizkigu, bekigu, bekizkigu.
Dakigu, darigu, datorkigu, daramakigu, dabilkigu.
2) Txiru-liru, firu-firu.
4) Hiru, mairu, hamairu.
Gatibu, enpaidu.
5) Tribu, katigu, gaztigu, kastigu, eskribu, testigu, bixigu.
Bandidu, partidu, sentidu, deskuidu.
Biru, diru, miru, mairu, pairu, armairu, altzeiru, mortairu, solairu, alokairu.
*O=U:* Motibu, erretiru.

Bizkaiera: Hornidu, sentidu, mogidu, korridu.

## O

1) a. Diogu, damaiogu, daramaiogu, badezaiogu.
5) Progu, modu, bizimodu.
Foru, goru, koru, zoru, lurzoru.
Erloju, torloju.
6)
*GU:* Logu, igarogu.

## UA

5) Kua, legua, tregua, ketxua, kapikua.
Nikaragua, Akonkagua.

6)

*A:* 1. Galdua, heldua, galdetua, bildua, errotua, apurtua.
2. Ganadua, errua, gatibua, modua, burua. (Ikus U bokalez amaituak).

*OA-UA:* Esklabua, arrarua, berua, girua, gogua.

Bizkaiera: Daua, baneua, baleua.

## AE

5) Bahe, galbahe, kanpae, gaztae.

## EE

1) a. Diezakee, niezakee, nakikee, nenkikee.

4) Mehe, xehe.

5) Ehe, behe.

Bizkaiera: Dautsee, badagiee, leukee, zeinkee, lekarkee.

## IE

1) a. Die, banie, balie, banakie, bazenkizkie, bekie, hakie, zakizkie, datorkie, dakarkie.

2) Sine die.

5) Serie, espezie.

*A-EA = IE:* – Famie, aukerie, birie, lokie, dudie.
– Bakie, betie, bidie, deñporie, agurie.

Bizkaiera: Zarie, zaitie, leikie, badagie, banengie, naitekie, leitekie, dakie, balekie, zagozie, zatozie, zabizie.

*EE-IE:* Leukie, daukie, zeinkie, zeunkie.

## OE

5) Ohe, dohe, atoe, galgoe, heroe, hiloe, oboe, koroe, botoe, lodoe.
Poe, Crusoe.

Bizkaiera: Haroe, naroe, daroe, dinoe, dautsoe, bazeuntsoe, begioe, badagioe, bazengioe, zeinkioe, leikioe.

## UE

1) a. Duzue, nauzue, gaituzue, daramazue, diguzue, diozue, ezazue, ezazue... ZUEduen guztiak.
5) Azkue.
*UA = UE:* Katue, lekue, sufritue, ukitue, burue, mutue.
*OA = UE:* Gakue, berue, motibue, orpue, trukue.

Bizkaiera: Dautzue, dauskuzue... ZUE-TZUEdun guztiak.

## AI

SIL.BAK.: Ai, bai, blai, gai, gay, nahi (nai), sai, zai, jai, kai, lai, mahai (mai), zahi (zai), tai.

### A

1) c. Garbai (izan).
d. Amai, jarrai.
2) Jarrai (zuri, horri...).
4) Alai, arrai, galai, garai, lasai, nasai.
5) Abai, agai, anai, amai, azai, azkai, daldai, garbai, sabai, garai, garbai, zardai, gaztai, kanpai, landai, tantai, lastai, marai, ardagai, azafrai, irasai, papagai.
Xangai.
6)
*GAI-KAI:* 1. Senargai, aitagai, ugazabagai, aberasgai, urkagai.
2. Ikaskai, osakai, gozakai, hazkai, harakai.
3. Eramangai, barkagai, jangai, ikaragai.
*NAHI:* 1. Noranahi, nolanahi, zenbatnahi, zertaranahi.
2. Esanahi, botanahi, goranahi.
*ZAI:* Artzai, astazai, mandazai.
*AI:* Alabai, ugazabai, asabai, izarrai.

### E

4) Etsai, ernai, esnai, eslai, deslai, zelai, alderrai.
5) Elai, emai, epai, ezpai, ezbai, eztai, etsai, endai, errai, zemai, zelai.
6)
*AI:* Juezai, daudenai, onenai, kemenai.
*GAI-KAI:* 1. Andregai, jabegai, adiskidegai, traidoregai, aguregai.
2. Erregai, betegai, edergai.
3. Asegai, lehergai.
*NAHI:* 1. Zernahi.
2. Hobenahi, edernahi, ohorenahi, boterenahi.
*ZAI:* Atezai, etxezai, kalezai, bidezai, umezai.

## I

5) Ibai, izai, iztai, dirdai, zildai, faisai, gabirai, igitai, girigai.
Bizkai.

6)

*AI:* Argiai, txikiai, handiai, hiriai.

*GAI-KAI:* 1. Handigai, erigai, idigai, zerrigai.
2. Hilgai, bizikai, jakingai, hornikai.
3. Egingai, harilgai.

*NAHI:* 1. Noiznahi, norinahi, nondinahi.
2. Handinahi, bizinahi, onginahi, edukinahi.

*ZAI:* Itzai, erizai, idizai, hirizai, argizai.

## O

5) Dohai, jorrai, bonsai, gogai, gotzai, soslai, anpolai.

6)

*AI:* Onai, zorrai, eroai, gizonai, arbolai.

*GAI-KAI:* 1. Ezkongai, gizongai, esklabogai, ardogai.
2. Ehogai, ongai.
3. Lorgai, itxarongai.

*NAHI:* 1. Nornahi, nonahi.
2. Ondonahi, askonahi.

*ZAI:* Sorozai, zorozai, erozai, basozai, presozai.

## U

1) c. Usai (egin).

5) Unai, urdai, usai, ustai, uztai, kapusai.
Uruguay, Paraguay.

6)

*AI:* 1. Gusugai, soldadugai, zakurgai, aingerugai.
2. Ikuskai, irakurgai.
3. Neurgai, entzungai, erantzungai.

*NAHI:* 1. Nortzunahi, zertzunahi.
2. Dirunahi, jaunahi, agindunahi.

*ZAI:* Diruzai, ortuzai, larruzai, ostatuzai, urzai.

## EI

SIL.BAK.: Dei, behi (bei), gei, gehi (gei), lei, sei, sehi (sei).

1) c. Adei (izan).

2) Aiei, balei, okey.

4) Hamasei, hogei, berrogei.

5) Adei, ekei, eztei, istei, izei, hodei, hockey, poney, ustei.
Hemingway, Huxley, Presley, Shelley.
Uzei, Opus Dei.

6)
*EI:* Izarrei, alabei, denei, berei, haiei, guztiei, gizonei, hauei, zuei.
*GEI-KEI:* Ikus GAI-KAI.

## II

5) Ihi, bihi, zihi, mihi.
Ikus BI-DI-GI-RI: hiri, higi, idi, biri...

## OI

SIL.BAK.: Oi, ohi (oi), doi, goi, lohi (loi), koi, sohi (soi).

### A

4) Batoi, xaloi, zaloi, marroi, fanfarroi, bizkarroi.
5) Waloi, baloi, saloi, taloi, pantaloi, espaloi, triatloi.
Erraldoi, zerraldoi.
Argoi, bagoi, dragoi, xaboi.
Arpoi, balkoi, kapoi, tapoi, takoi, kantoi, ganpoi, granpoi.
Atoi, matoi, patroi, kantoi, arratoi, maratoi, gurgatoi.
Lantzoi, martxoi, pikatxoi.
Sarroi, sagarroi, zankarroi, tragarroi, makarroi, esparroi.
Kaxoi, sasoi, masoi, blasoi, arrazoi, zarrazoi, bidasoi.
Hanoi.
6)
*OI:* Danoi, garanoi, gabiltzanoi.
*OI-KOI:* Emakoi, ardankoi.
*DOI-TOI:* Zehadoi, iraztoi.
*ON = OI:* Kanoi, kartoi, faraoi, zimarroi, galoi, tanpoi, baskoi, bastoi.

### E

4) Sabeloi.
5) Emoi, hedoi, heroi, herdoi, erroi, betroi, lehoi, meloi, sentoi, sermoi, pezoi.
6)
*OI:* Denoi, garenoi, gaudenoi, besteoi, langileoi.
*OI-KOI:* Berekoi, bestekoi, andrekoi, umekoi, kalekoi.
*DOI-TOI:* Lerdoi, ameztoi.
*ON = OI:* Peoi, pregoi, flemoi, tendoi, kalderoi, panteoi, partenoi, elektroi, pertxeroi, orfeoi, bodegoi, mosketoi, akordeoi, kamaleoi.

### I

4) Milioi, miloi, anfitrioi, autrigoi.
5) Hidoi, gidoi, jipoi, tifoi, limoi, listoi, pistoi, minoi, playboy, zirdoi, zikloi, antizikloi, almidoi, ezkiloi, espioi, perdigoi, tximinoi, hormigoi.

6)
*OI:* Hazioi, erdioi, guztioi, ibilioi.
*OI-KOI:* Handikoi, suminkoi, erdikoi, geldikoi.
*ON = OI:* Kainoi, kamioi, bidoi, minoi, sifoi, bisoi, kamisoi, batailoi, enbrioi, biberoi, histrioi, motiloi, polizoi.

## O

1) c. Otoi (egin).
2) Otoi.
4) Morroi.
5) Otoi, orkoi, bonboi, koroi, morroi, morgoi, poldoi, pozoi.
Tolstoi.
6)
*OI:* Gizonoi, azpikooi, kokolooi.
*OI-KOI:* Gerokoi, gizonkoi, odolkoi, gogorkoi.
*ON = OI:* Botoi, konboi, kondoi, kordoi, kotoi, fotoi, frontoi, mormoi, montoi, montzoi, porroi, protoi, tronboi, saxofoi, pelotoi, kolofoi, polboroi, melokotoi.

## U

4) Urgoi, burgoi.
5) Butroi, bufoi, turroi, trumoi, puntzoi, zutoi, kurloi, burgoi.
6)
*OI:* Lagunoi, ahuloi, zapalduoi, errudunoi.
*OI-KOI:* Lagunkoi, dirukoi, burukoi, mundukoi, bildurkoi.
*ON = OI:* Furgoi, kupoi, buzoi, neutroi, epuloi, autrigoi, tiburoi, alubioi.

# UI

1) c. Ajui, ijui (egin).
4) Zalui.
5) Bui, kui, suhi, aiui, ajui, ijui, ipui.
6)
*DUI:* Sagardui, artedui, bustindui.

# AO

1) c. Mao, marrao, birao, alarao (egin).
4) Umao, papao.
5) Aho, abao, arao, ardao, azao, marrao, kakao, biao, birao, bakailao, curaçao, alarao.
Castelao, Menelao.
Ugao, Bilbao.

## EO

1) a. Dakikeo, dakizkeo, nenkikeo, lekikeo, nikeo, niezakeo, diezakeo.
b. Eho.
c. Deseo (ukan).
2) Arteo.
4) Ateo, arameo, krustazeo, etereo, benereo, pigmeo, manikeo, orkideo, espontaneo.
5) Apeo, arreo, bateo, tebeo, txekeo, deseo, maiseo, bideo, trineo, lizeo, koliseo, oleo, solfeo, trofeo, torneo, boxeo, museo, nukleo, ateneo.
Mateo, Orfeo, Galileo, Romeo, Prometeo, Ptolomeo.

## IO

SIL.BIK.: Dio, io, pio, txio, zio.

### A

1) a. Banio, balio, dario, banakio, badakio, hakio, dakarkio, dohakio.
b. Jario, iratio.
c. Balio (ukan).
2) Adio, artio, orandio, horratio.
4) Ario, kario, kontrario.
5) Abio, balio, jario, lakio, ganbio, mandio, narrio, palio, plagio, radio, adagio, aldamio, arrabio, armario, kalbario, kanario, marmario, enganio, erlabio, eldarnio, erradio, desafio, irabio, bikario, sikario, kontagio, zorabio, bozkario, uranio, usadio, azenario, komentario, dromedario, arrosario.
Dario.
Ontario.
6)
*GATIO:* Horregatio, zergatio, gugatio, anaiagatio.
*RIO:* 1. Primario, kortsario, arbitrario, antikuario, boluntario, libertario, mertzenario, sekretario, proletario, botikario, solidario, unitario.
2. Sumario, kalendario, eszenario, inbentario, erlikario, akuario, estuario.

Bizkaiera: Nintzakio, litzakio, badagio.

### E

1) a. Bagenio, bazenio, banenkio, balekio, bekio.
2) Gehio, medio.
4) Serio, arerio.

5) Herio, helio, jenio, nerbio, gremio, premio, setio, gestio, sugestio, adberbio, arerio, arpegio, emendio, mendekio, inperio, kolegio, komenio, poderio, gomendio, ebanjelio, kandelerio, erremedio, sakrilegio, pribilegio.
Tiberio.

6)
*RIO:* Kriterio, misterio, ministerio, adulterio.

Bizkaiera: Banengio, bazengio.

**I**

1) a. Dizkio, zaizkio, bekizkio, darizkio, dabilzkio, darabilkio, balebilkio.
c. Fio (izan), txilio, txirrio (egin).
2) Horraitio, oraindio.
5) Kirio, txilio, txirrio, lirio, anfibio, martirio, delirio, erlijio, idilio, pirinio, printzipio, kontzilio, subsidio, suizidio, aluminio.
Plinio, Virgilio, Ovidio.

6)
*GAITIO:* Horregaitio, guregaitio, haiengaitio.

Bizkaiera: Daikio, neikio, geinkio, leikio.

**O**

1) a. Dagokio, dagozkio, natorkio, balegokio, banentorkio.
2) Propio, motu propio.
5) Olio, opio, bronkio, sodio, amodio, harmonio, akordio, gasolio, petrolio, demonio, kelonio, istorio, binomio, mikrobio, ondorio, plutonio, oroldio, monopolio, periskopio, mikroskopio.
Antonio.

6)
*TORIO:* Auditorio, errepertorio, krematorio, purgatorio.

**U**

5) Audio, saurio, dinosaurio, argudio, arrubio, augurio, estudio, merkurio, preludio, konjurio, komunio, durundio, durdurio, latifundio.
Amurrio, Danubio.

Bizkaiera: Neuskio, geunskio, leuskio.

## AIO-EIO-UIO

SIL.BIK.: A(d)io, iaio, jaio, kaio, zaio, saio.
1) a. Damaio, daramaio, baneramaio, banintzaio, balitzaio.
b. Eiho.
c. Arbuio (ukan).
2) Zer arraio, eta arraio.

4) Arraio, lakaio, eslaio, zipaio, soraio, tokaio.
5) Yo-yo, bataio, garraio, abalaio, papagaio.
Arbuio.
Ponpeio.
Aramaio.
6)
*AGO=O:* Nahi(ag)o, gehi(ag)o, alai(ag)o, morroi(ag)o, burgoi(ag)o.

Bizkaiera: Leio, baneio, baleio, beio.

## SIO-ZIO-TZIO

### A

5) Azio, akzio, kaltzio, nazio, palazio, errazio, erlazio, espazio, potasio. Inazio, Horazio, Pankrazio.

6)
*ZIO:*
1. Asmazio, gogorazio, ukazio, amorrazio, dirdirazio, madarikazio, benedikazio.
2. Trakzio, deflazio, tentazio, inbasio, aleazio, konparazio, informazio, edukazio, ilustrazio.

*SIO:* Pasio, okasio.

### E

1) Desio (ukan).
5) Desio, lesio, lezio, presio, prezio, sesio, sekzio, tertzio, magnesio, trapezio, desprezio, dibertsio, obsesio, koneksio.
6)
*ZIO:* Agresio, anexio, elekzio, depresio, infekzio, injekzio, direkzio, objekzio, konexio.
*SIO:* Espresio, inbertsio, inpresio, digresio, opresio, kohesio, konfesio, profesio, progresio, konpresio.
*TZIO:* Atentzio, konbentzio, subentzio.
*TSIO:* Bertsio, flexio, inflexio, pentsio, tentsio, pretentsio, perbertsio, dimentsio, distentsio, subertsio.

### I

2) Kaisio.
5) Zio, bizio, fikzio, misio, imintzio, tradizio, traizio, dibisio, zilizio, ofizio, judizio, juizio, intuizio.
6)
*ZIO:* Benedizio, madarizio, partizio, solstizio, fundizio, munizio, armistizio, superstizio, inkisizio.
*SIO:* Fisio, prisio, transmisio, emisio, dimisio, omisio, kolisio, komisio.

## O

1) c. Debozio (ukan).
4) Sozio.
5) Nozio, mozio, debozio.
Anbrosio.
6)
*ZIO:* Mozio, emozio, konmozio, proportzio.
*SIO:* Erosio, esplosio, distortsio, korrosio.

## U

5) Ilusio, infusio, konklusio.
Konfuzio.
6)
*ZIO:* Indukzio, poluzio, soluzio.
*SIO:* Fusio, perkusio, intrusio, konfusio, konklusio.

# AU-EU

SIL.BAK.: Hau, gau, lau, nau, dau, rau, txau, blau, brau, pau, uau. Neu, heu, geu, zeu.
1) a. Dirau, balirau, banirau.
c. Barau, marrau, birau, miau (egin).
3) Nerau, gerau, berau, bereu.
4) Hamalau, enparau, bilau, kristau.
5) Arau, arrau, garau, mamau, marrau, zamau, karnau, alarau, gaztelau, kaperau, errefrau, gortesau, birau, zirau, kristau, artisau, farisau, sakristau, ermitau, eskribau, kofau, mokau, zirujau.
6)
*ATU = AU:* Kantau, parau, azartau, gastau, gustau...

Bizkaiera: 1. Baneu, baleu, baheu.
2. Atu = eu: kanteu, salbeu, olgeu, ondreu, kondeneu, mimeu, topeu, konteu, sumeu, gusteu...

# IU

b. Koiu.
1) c. Oihu (egin).
5) Taiu, oihu, baleiu, barreiu, maneiu, entseiu, debeiu.

# BESTE BATZUK

## NIK

### A

ADITZA: Nik (nau).
Didanik, zaidanik, daramanik, datzanik, naizanik.
PARTIZIPIOA: Emanik, eramanik, etzanik, esanik, izanik, janik, edanik, iraganik.
ADBERBIOAK: 1. Bakanik, labanik, otzanik, beltzeranik.
2. Halanik, holanik, zelanik, bestelanik.
3. Jadanik, lehendanik, betidanik, gaurdanik, aspaldidanik, gabetanik.
PARTITIBOA: 1. Lanik, orbanik, buztanik, afanik, bakanik, oihanik.
2. Aita(re)nik, ama(re)nik, norberanik, bestea(re)nik.
MUGAGABEA: Lamik, mamik.
*GANDIK=GANIK*: Niganik, zuganik, haienganik, harganik, gureganik.

### E

ADITZA: Denik, dutenik, garenik, daudenik, zuenik.
PARTIZIPIOA: Etenik, irtenik, edirenik.
ADBERBIOAK: Lehenik, aurrenik, hurrenik, azkenik, zuzenik, gehienik, gutxienik, gizenik.
PARTITIBOA: 1. Baimenik, kemenik, zekenik, zezenik, itxaropenik.
2. Zuenik, inorenik, batenik, besterenik, gizonenik.
MUGAGABEA: Albenik, premik.

### I

ADITZA: Daki(e)nik, zeki(e)nik, dirudi(e)nik.
PARTIZIPIOA: Jakinik, eginik, ekinik, ezinik, eraginik, irakinik.
ADBERBIOAK: Orainik, dohainik, apainik, lirainik, zikinik, gordinik, urdinik, zutinik.
PARTITIBOA: Minik, haginik, berdinik, hirinik, sorginik.
MUGAGABEA: Ninik, tximinik.

### O

ADITZA: Dagonik, dionik, zaionik, nionik, genionik.
PARTIZIPIOA: Jagonik, egonik, emonik, igonik, eragonik, itxaronik, erionik.
ADBERBIOAK: Onik, sakonik.
PARTITIBOA: 1. Txanponik, santsonik, sentonik, gizonik, zorionik.
2. Ino(re)nik, bionik, denonik, guztionik.

### U

ADITZA: Dugunik, digunik, zaizunik, duzunik, zaigunik.
PARTIZIPIOA: Irunik, ehunik, errunik, iraunik, ihardunik, etzunik, entzunik, erantzunik.
ADBERBIOAK: Astunik, leunik, itunik, bigunik, lizunik, urrunik, zutunik, txukunik.
PARTITIBOA: Lagunik, ezagunik, tuntunik, egunik, errudunik.
MUGAGABEA: Burnik.

## RIK

DIK, BIK: Atera dik, hobe dik, hori dik, espero dik, sartu dik. Aingira bik, ume bik, txori bik, zoro bik, aingeru bik.

### A

PARTIZIPIOA: Lagarik, faltarik, pasarik, oparik, botarik, kostarik, gurarik, aterarik.
PARTITIBOA: Erarik, gauzarik, ezpatarik, ikararik, makiladarik.
ADBERBIOAK: Barik, gabetarik, badarik, berarik, lokarik, artegarik.
LARIK: Delarik, zelarik, dugularik, geundelarik.
TARIK: 1. Umetarik, gaztetarik, haurretarik, txikitarik.
2. Zuetarik, gutarik, haietarik, lurretarik, gizonetarik, guztietarik.
MUGAGABEA: Hamabik, salatarik, agintarik, aharik, gudarik.
Bizkaiera: Nagik, eragik, darabik, badagik, banagik.

### E

PARTIZIPIOA: Aserik, errerik, ernerik, beterik, gorderik, usterik.
ADBERBIOAK: Gaberik, gazterik, tenterik, librerik, tristerik, goserik, solterik.
PARTITIBOA: Airerik, parerik, bederik, maiterik, hoberik, urrerik, kalamitaterik.
MUGAGABEA: Erik, azerik, komerik, egik, begik, orlegi, gehiegik, gutxiegik, larregik.
T(Z)ERIK: Sartzerik, betetzerik, izaterik, egoterik, aberasterik.
Bizkaiera: Egik.

### I

PARTIZIPIOA: Aririk, jarririk, hasirik, hezirik, ibilirik, edukirik.

ADBERBIOAK: Garbirik, geldirik, bizirik, hordirik, lohirik, lodirik, urririk, zuririk.
PARTITIBOA: Harririk, ogirik, ongirik, erdirik, izerdirik.
MUGAGABEA: Idik, bihik, mihik, zirik, ontzidik.

### O

PARTIZIPIOA: Jorik, jasorik, ehorik, igorik, itorik, igarorik, esperorik, idororik.
ADBERBIOAK: Sanorik, salborik, baporik, faltorik, erorik, berorik, freskorik, gaisorik, osorik.
PARTITIBOA: Lorik, ardorik, askorik, aurrekorik, antzekorik, oztoporik, bezalakorik.
MUGAGABEA: Ogik, gorik, txorik, hilobik.
IZENORDEAK: Hori(e)k, berorik.

### U

ADITZA: Dirudik, zirudik.
PARTIZIPIOA: Harturik, sarturik, zabaldurik, eskaturik, kendurik, lagundurik.
ADBERBIOAK: Baraurik, damurik, gerturik, presturik, muturik, justurik, gatiburik.
PARTITIBOA: Urik, modurik, konturik, bururik, segururik.
MUGAGABEA: Hurik, zubik, gurik, marrubik, irudik, urdurik.

## RRIK

HIK, DIK, BIK: Behar dik, zer dik, zor dik, segur dik.
Behar hik, leher hik, hor hik, gaur hik.
Senar bik, eder bik, behor bik, zakur bik.

### A

PARTIZIPIOA: Beharrik.
ADBERBIOAK: Beharrik, halabeharrik, bakarrik, zaharrik, baldarrik, iharrik, suharrik, iratzarrik.
PARTITIBOA: Harrik, txarrik, eta abarrik, negarrik, belarrik, indarrik, bularrik.
MUGAGABEA: Belarrik, oinarrik, uztarrik, lotsagarrik.
Argik, ilargik, Lizardik.

### E

ADBERBIOAK: Alferrik, ankerrik, ederrik, okerrik.
PARTITIBOA: Akerrik, landerrik eperrik, eskerrik, biperrik, okerrik, uzkerrik.
MUGAGABEA: Berrik, herrik, gerrik, zerrik, aberrik, laterrik.
Erbik, izerdik.

### I

PARTITIBOA: Fakirrik, ñirñirrik, txirtxirrik.
MUGAGABEA: Irrik, zirrik, txirritxirrik.

### O

ADBERBIOAK: Gorrik, agorrik, jatorrik, lehorrik, elkorrik, derrigorrik, doilorrik, bizkorrik, gogorrik.
PARTITIBOA: Gorrik, zorrik, danborrik, behorrik, zigorrik, burugogorrik.
MUGAGABEA: Orrik, gorrik, zorrik, jatorrik, txantxangorrik.
Hordik, elordik.

### U

ADBERBIOAK: Samurrik, maltzurrik, makurrik, bildurrik, zihurrik, zuhurrik.
PARTITIBOA: Lurrik, haurrik, agurrik, apurrik, lapurrik, elurrik, gezurrik, muturrik.
MUGAGABEA: Urrik, inurrik, iturrik, bihurrik, neurrik.
Gurdik, ipurdik, Lapurdik.

## LIK

HIK, DIK, BIK: Estal hik, ustel dik, batel bik, zail dik, bil hik, bolbol dik, odol dik...

### A

ADBERBIOAK: Apalik, argalik, azalik, zabalik, makalik, masalik, leialik, eskuzabalik.
PARTITIBOA: Magalik, tamalik, hegalik, itzalik, kriminalik, naturalik.
MUGAGABEA: Animalik, burduntzalik.
Aldik, zaldik.

### E

ADBERBIOAK: Epelik, ergelik, tentelik, goibelik, motelik, ubelik, ustelik.
PARTITIBOA: Fardelik, gibelik, orbelik, hotelik, motelik, uhelik.
MUGAGABEA: Elik, gelik.
Elbik, geldik.

### I

PARTIZIPIOA: Hilik.
ADBERBIOAK: Soilik, isilik, zintzilik, gosekilik, kiribilik, umilik, hurbilik, zurbilik.
PARTITIBOA: Zailik, abantailik, abilik, jentilik, mutilik, biribilik.
MUGAGABEA: Lilik, Zizilik, kilikilik.

### O

ADBERBIOAK: Ikolik, bolbolik.
PARTITIBOA: Oholik, odolik, oskolik, uholik.
MUGAGABEA: Zoli, Manolik.

### U

ADBERBIOAK: Ahulik, mardulik, margulik.
PARTITIBOA: Enulik, eztulik.
MUGAGABEA: Zaulik, eulik, mandeulik.

## SIK-ZIK

HIK, DIK, BIK: Irabaz hik, erraz dik, eskas bik, merez hik, errez dik, aldrebes bik, eros hik, erruz dik...

### A

ADBERBIOAK: Kasik, narrasik, errazik, eskasik, larru-hasik, buru-hasik.
PARTITIBOA: Baldrasik, kapazik, efikazik, jolasik, konpasik.
MUGAGABEA: Hazik, nazik, sasik, artasik, nahasik, ikasik.

### E

ADBERBIOAK: Ezik, ez-ezik, ondoezik, izan ezik, trabesik, errezik, artezik, aldrebesik.
PARTITIBOA: Amesik, babesik, ezmesik, lanabesik, errebesik, ezerezik.
MUGAGABEA: Hezik, hesik, eresik, berezik, harresik.

### I

ADBERBIOAK: Baizik, maizik, beraizik, goizik, noizik, mirrizik.
PARTITIBOA: Anisik, apaizik, krisisik, aprendizik.
MUGAGABEA: Bizik, ihizik, garraisik, gutizik, justizik.

### O

ADBERBIOAK: Pozik, adosik, ortozik, aproposik, abundosik.
PARTITIBOA: Sosik, arrozik, kaosik, baliosik, amorosik.
MUGAGABEA: Egosik, erosik, hipnosik.

### U

ADBERBIOAK: Flusik, biluzik, anpurusik.
PARTITIBOA: Deusik, ezteusik, negusik, jesusik, amurusik.
MUGAGABEA: Auzik, nagusik, itsusik, biluzik, aharrausik.

# TSIK-TZIK

HIK, DIK, BIK: Ahantz hik, hartz bik, anitz dik, utz hik, gorputz bik...

## A

ADBERBIOAK: Baltzik, latzik, garratzik, narratsik, zehatzik, mingatsik.
PARTITIBOA: Antzik, galtzik, gatzik, satsik, ardatzik, lorratzik, ugatzik, urratsik.
MUGAGABEA: Amatxik, erantsik, bederatzik.

## E

ADBERBIOAK: Beltzik, traketsik, marketsik.
PARTITIBOA: Ametsik, baietzik, ezetzik, aketzik, saihetsik, ertzik, lupetzik.
MUGAGABEA: Hertsik, irentsik, miretsik.

## I

ADBERBIOAK: Gaitzik, zikoitzik, likitsik, bortitzik, murritzik.
PARTITIBOA: Haitzik, bekaitzik, hitzik, zintzik, fitsik, sitsik, urritzik.
MUGAGABEA: Gitxik, bitxik, iritzik, irrintzik, goraintzik, probintzik.

## O

ADBERBIOAK: Hotzik, motzik, mingotsik, zikotzik, zorrotzik.
PARTITIBOA: Hotsik, harotzik, bihotzik, izotzik, gorotzik, amilotxik.
MUGAGABEA: Ontzik, zortzik, ehortzik, zinegotzik.

## U

ADBERBIOAK:
1. Hutsik, larrutsik, mangutsik, besutsik, oinutsik, triputsik, ortutsik.
2. Kamutsik, zurtzik, aputzik, malmutzik.

PARTITIBOA: Hautsik, funtsik, putzik, ahuntzik, gorputzik.
MUGAGABEA: Gutxik, igurtzik, imurtzik, burduntzik.

# AURKIBIDEA

# I

# BERTSOLARITZAREN INGURUNEA

## KIROL ETA JOLAS

Bertsolaritzaz mila gauza esan da: arte bat dela, euskal kulturaren esentzia, folklorearen adar bat, ahozko literaturaren ardatz, euskararen eusle eta abar. Hain gauza ez-onak ere esan dira bertsolaritzaz: arte pobrea dela, jende ezjakinaren adierazpidea, formula batzuren errepika ia mekanikoa, arte zakarra eta abar.

Idealtzeen edo arbuioen aurretik, eder ala zakar den pentsatzen hasi aurretik, bertsolaritza dibertsio bat dela esango bagenu, ez genbiltzake funtsetik urrun. Geroago xehatuko dugunez, bertsolaritza dibertitzeko modu bat da. Dibertsioa oso hitz zabala izanik ere, badakigu zer arlotan gabiltzan. Hura lanaren biki-laguna da edo izan behar luke. Erromeriak, ihauteriak, ibilaldiak, dantzaldiak, gaupasak eta horrelakoak dibertsioak dira. Bertsolaritza ere, bere giro batean, horrelakoxe dibertsio bat da.

Haurrak sokan, harrapaka, jostailuekin atzera-aurrera, zerbait arrastatzen edo eurek dakiten zernahi egiten ari direnean, jolasean ari direla esaten dugu. Jolasa eta dibertsioa ez dira kontzeptu berdinak. Honetan, bertsolaritza ere jolas bat dela esan dezakegu.

Esku pilotan, futbolean, korrika, iheri, haizkoran, harri jasotzen eta abar ari direnean, kirolean ari direla esaten dugu. Gauza horiek denak, halako ahalegin eta egitura maila baten barruan eginik, kirolak dira. Gauza berak erdi informalki eta gehiegi egituratu gabe burutzen direnean, jolas bilakatzen dira.

Ez da berdin esku pilota partidu bat jokatzea eta horma baten kontra tik eta tak aritzea. Kirolak bere ritmoa eta bere konotazio sozialak dauzka. Bertsolaritza kirol bat dela ere esan dezakegu.

Azken kirolok joko edo dema kutsua daukate. Kutsua bakarrik ez, jokoak dira, Euskal Herrian batez ere. Kirolik gehienei nor-gehiago hori kenduz gero, erdi biluzik gelditzen dira.

Batzutan ikusleen arreta nork irabaztean dago jokoa. Beste batzutan ikusleak jokoan parte hartzen du, dirua jokatuz. Nor-gehiago, joko, dema, apustu... Hitz horiek denek euskaldun baten belarrietan ez dute esplikazio gehiegi behar. Jokoaren edo demaren emozioa badakigu zer den. Sentsazio hori ematen dutenei jokoak esaten diegu. Bertsolaritzak badu alderdi hori ere, desafio eta txapelketetan argi nabari denez.

Bertsolaritza, beraz, jolasa, kirola, jokoa da. Alderdi horiek guztiak biltzeko hitz bat harturik, bertsolaritza dibertsio bat da. Hizkuntzan oinarrrituriko dibertsio mentala. Euskal Herriaren historian zehar, bizikerak izan dituen aldakuntzetan, dibertsioak ere aldatuz etorri dira, bizitzeko modua eta dibertitzeko modua elkar-loturik baitoaz. Horregatik bertsolaritzaren izatea eta historia ulertzeko, hura sortu eta zabaldu zen biziera eta dibertiera ulertzea beharrezko da. Ez diot hau alderdi bakarra denik, baina bai beharbada erdi ahazturik edo bazterturik daukagun alderdia. Bertsolaritza politizatzera edo ideologizatzera halako joera den garaiotan, beste alderdia berritzea ez da gaizki etorriko.

## LEHENGO DIBERTSIO MOLDEA ETA ORAINGOA

Noiznahi eta nornahik dioena da oraingo bertsolaritza eta lehengoa ez direla berdinak. Baita lehenaren nostalgia ere badago askotan. Sarritan entzuten duguna da: *orain ez duzue lehen bezala kantatzen*. Hori esatean, sagardotegiak, tabernak eta lehengo giroa daukagu gogoan. Lehengo bertsolaritza eta oraingoa ezberdinak direla argi dago. Ez dugu esango zein den hobea eta zein txarragoa, zergatik aldatu den ulertzen saiatu baizik. Aldakuntza horren oinarrietarik bat lehengo eta orain dibertsio eskemen arteko ezberdintasuna da.

*Lehen* eta *orain* esatean, badakigu bizierak eta pentsaerak ez direla goizetik gauera aldatzen, ez eta toki guztietan berdin eta ber-denboran ere. Toki batzutan eskema zaharra da nagusi, beste batzutan berria, eta denetan, gutxiasko, nahasirik egoten dira. Transizioa esaten zaiona da hori. Transizio sozialak eta kulturalak mendeetakoak izan daitezke eta munduko joanetorria etengabeko transizio bat dela dioena ez dabil gaizki.

Gure kasuon, *lehengo biziera* diogunean, gehienok biziera rurala, geldi samarra eta eskolak garrantzi gehiegi ez zeukana ulertzen dugu. Biziera hori

ez da guztiz galdu. Ez noski. Gaur ere ez dago gutxi lehengo bizieratik, pentsakeraz batez ere, industri giroan bizi arren, buruek egitura rurala baitute.

Lehengo bizikeran, dibertsio moldea honelakoa litzake gutxi gora behera. Asteko dibertsio eguna bakarra zen: igandea. Eta igandea bera ere arratsaldez, goizean, lan astunik egingo ez bazen ere, eginkizun erlijiosoak eta hauen inguruko giro eta lagunarteak nagusi baitziren. Arratsaldean erromeria. Hantxe kontzentratzen zen asteko dibertsioa. Erromeria herrian bertan edo albo-herri batetan izango zen, beti ere kilometro gutxiren barruan. Hasi aurretik, ordubeteren bat jendea biltzen eta abar. Erromeria bera, musika eta dantza alegia, ordu batzu, udan luzeago, neguan laburrago. Bukatutakoan, beste orduren bat edo bi plaza inguruan eta ondoren neska laguntza eta abar. Ilunabarra *erretiro onen* hasera izango zen eta goizaldea *erretiro txarren* muga, tarteka biharamon osoa etxeratu ezinik egingo bazen ere.

Gauza jakina da *erretiro onak* ez zirela denentzat berdinak. Neskek goiz etxeratu behar zuten. Mutilak, neske laguntza ondoren, berriro tabernara edo sagardotegira itzultzea ez zen hain nabarmena. Neska-laguntzako ordu misterios horren aurretxoan eta ondoren batez ere, bertsolarien ordua zen, norbait baldin bazen behintzat. Ordu horiek bazuten aparteko berezitasunik. Erromeria bukatu arren, dibertsioa nola edo hala luzatu nahi zen, gero aste osoa lanerako baitzetorren. Inork ez zuen etxerako gogorik. Goiz zihoazenak derrigorrez zihoazen, etxeko bildurrez, apaizen zorroztasunez eta abar, neskak eta mutil gaztetxoak batez ere. Baina erretiro zorrotzen eztenik gainean ez zeukanak nekez hartuko zuen etxera biderik. Joanbehar zorrotza zeukatenak ere sarritan deskuidatuko ziren, gero etxean trumoia izango bazen ere.

Etxerako gogorik ezaz gainera, ordu horietan zerbait jaten eta batez ere edaten zen eta barrua gero eta animosoago. Zertan denbora eman? Bertsolaririk bazen, huraxe zen une egokia. Alde batetik bertsolariak berak ere dibertitu nahi eta gehienean etxerako presarik ez. Bestetik entzuleak ere gero eta saltsa-gogo gehiago. Zer gehiago nahi duzu? Eta puntu batetik aurrera denak bertsolari. Ez dugu esango denak horretan arituko zirenik. Gogoa zeukatenak berez-berez bilduko ziren. Edo bestela ekitaldi bat bertsotan, gero berriketan edo algaraka, gero berriro bertsotan, gero jokoan eta horrelatsu. Deskribapen zehatzegirik egin gabe ere, ez da zaila honelako igande bat arratsaldetik goizaldera iruditzen.

Dibertitzeko molde honen barruan bada zenbait faktore, dibertiera hura mugatzen eta determinatzen duena. Hona nagusiak:

*HERRI OSOA BATERA*: Molde horretan herri osoa batera dibertitzen zen. Horrek ez du esan nahi ondo edo gustora dibertitzen zirenik, hala zela baizik. Ezta herri osoa ondo konpontzen zenik ere, eskandaluak eta burrukak ez baitziren gutxi izaten. Bateratasun fisikoaz ari gara eta ez da gutxi. Erromeria batez ere gazteentzat zen, baina haurrak ere han ibiliko ziren inguruan, begira edo deabrukeriak egiten eta nolanahi ere erromeria euren gisara bizitzen. Emakume ezkonduak ere inguruan izango ziren, arrosariotik etxerantz bazen

ere. Eta eurak ere dibertitzen noski, berriketan edo begira bazen ere, han bait zeuden etxeko neska-mutilak, auzokoak, ezezagunak, baita kontrarioak ere. Gizon adinekoek tabernatik segituko zuten erromeria, baita tarteka hurragotik ere. *Guk ere geure sasoian...* eta horrela. Hitz batez, erromeria herriko dibertsioaren erdigune zen, bai bertan dibertitzen zirelako, bai hari buruz edo haren inguruan igandea pasatzen zutelako. Erromeria zen haurren poz, gazteen jolas eta kirol, emakumeen hizpide eta zaharren bizkorgarri.

*TOKI BEREAN GELDI:* Dibertitzeko era horren beste eragile handi bat hori da, hots, jendea ez zela urrutira mugitzen. Toki berean edo inguruan ibiliko ziren. Beraz, harreman handia eduki behar, fisiko hutsa bazen ere. Lagun nahiz etsai, elkarren ondoan ibili beharra zegoen.

*DENBORA LUZEA:* Toki berean ibiltzeak ez luke eragin handirik, denbora luzez izan ezik. Arratsalde erditik goizalderarte, ordu luzeak egiten zituzten elkar ikusiz edo ikusi ezinez. Ari garen harirako, berdin da elkar ikus-nahia nahiz ikus-ezina, bigarrenak beharbada eragin handiagoa baitauka. Bakoitzak hantxe edukiko zituen ikusi nahikoak edo ikusi ezinekoak. Eta hauek ere ikusi egin behar, toki berean denbora luzea eginez gero.

*DIBERTITZEKO GOGOA:* Zozokeria badirudi ere, denak dibertitzeko gogoan bat zirela esatea ez da alperrekoa. Gogoa baino gehiago ere bai, maiz zapuzturik etxeratuko baziren ere. Dentsitate hori bizierak berak emana zen noski, aurreko asteko zama osoa hustu behar baitzen han eta berriro aste osoa eta astuna baitzetorren. Hortik etxerako gogorik eza eta orduak lauskitu beharra. Hortik mila aldiz esana eta entzuna: *Aste erdi aurreko igandea gogoratzen eta beste erdi hurrengoaz pentsatzen.*

Gizarte eta dibertsio molde horren barruan, bertsolaria ez zegoen sobra, bera ere tarteko baitzen. Nola egongo zen ba sobra, bizierak berak sortarazi baitzuen gehienik bertsolaritza? Baina kontestu hartan bertsolaritzak berezia izan behar, bat-batekoa eta naturala. Gaiek ere arinak eta zorrotzak izan behar, garrantzi gabeak, intrazendenteak, hitz batez, dibertitzekoak edo entretenigarriak. Han dibertsioa zen nagusi, hura baitzen nahi zena eta behar zena. Eta dibertitzeko, kontu astunak eta ideologikoak lagun txarrak izan ohi dira, herritarrik gehienentzat behintzat.

Halako lagunarteetan bertso jarriak ere kantatuko ziren, dibertsio giroan beti ere. Bertso jarriak serioak ere izan zitezkeen, baina giro hartan ez zitzaion gaiaren seriotasunari gehien begiratuko, bertso jarrien egokitasunari eta haiek ematen duten gozamenari baizik. Diogun giroan, beraz, bertsolariak zernahi eta zenbatnahi, gai arinetan nahiz serioetan, baita zakarretan ere. Kantaera bizia, hutsei hainbeste begiratu gabe, datorrena datorren moduan eta aurrera. Horregatik bertsoketa honen kalitatea halamoduzkoa izango zen, kontestutik kanpora atera ezkero.

## BERTSO JARRIAK

Gizarte molde horretako bertsolariek non kantatzen zituzten gai serioak eta garrantzizkoak? Bertso jarrietan. Lehengo bertsolariek bazekiten, bai, gai serioak eta astunak ere kantatzen, batez ere gai politikoak, erlijiosoak, moralak eta gertaerazkoak. Baina gai horien tokia ez zen sagardotegia, bertso papera baizik. Horrela bertso jarrien tradizioa bertsolaritzaren bi adarretatik bat da, bestea baino garrantzitsuagoa beharbada. Historiako bertsolarien ezagutza hortik daukagu batez ere. Etxahunek edo Xenpelarrek nola inprobisatzen zuten ez dakigu. Hauek bertso jarrietatik ezagutzenn ditugu. Badira bertso asko bat-batekotzat jotzen direnak, Bilintxen *Domingo Kanpaña* adibidez. Baina bertso famatu hura eta beste horrelako zenbait bat-batekoak izan zirela sinestea zaila da.

Bertso berriak norberez ala aginduz jar zitezkeen. Bertsolariak bazituen gaiak, berak sentitzen eta azaldu nahi zituenak. Bakoitza nolakoa izan, halako ardurak eta sentipenak zeuzkan eta, beraz, halako bertsoak ateratzen. Txirritak, esaterako, ziri-bertsolari fama badu ere, bertso politiko asko jarri zuen, foruen kentzeaz batez ere. Xenpelarrek, beste askoren artean, bertso erlijiosoak ez ditu gutxi. Etxahun zuberoarrak bere bizitza krudela du gai nagusi. Eta horrela beste guztiak. Bertsolariek zer gehien sentitu zuten edo haien arreta zeren inguruan zebilen jakiteko, bertso jarrien bilduma aztertzea besterik ez dago. Bertso mota hauei esaten diegu *norberezkoak* edo norbere gogoz eginak.

Baina tradizio honetan aginduz eginak ere ez ziren gutxi. Hauen artean daude batez ere ezkontza galdutako bertsoak. Neska bat edo mutil bat bertsolariagana joango zen eta esango zion: *Aizu, lagunak utzi nau eta zuk bertso berriak jartzea nahi nuke.* Orduan neskak edo mutilak motiboak eta datuak kontatuko zizkion, –bere erara, jakina–, eta bertsolariak bertsoak jarriko zituen. Bertso hauek plazaratzean, ez da harritzekoa beste alderdiak min hartzea. Horrela gehienean ordainak etorriko ziren, hots, beste alderdiak ere bertsolari batengana joko zuen eta hari bere bertsioa kontatuko zion, aurreko bertsoei buelta emateko. Inoiz bertsolari izengabe bera izango zen bi alderdien bertso jartzailea.

Ezkontza galduen bertsoez gainera, bazen beste motiborik, bertsoak aginduz jartzeko: etxekoen edo auzoen arteko haserreak, urliak hau edo hori egin didala, jaunen batek berari bertso berriak dedikatzeko eskatzen zuela eta abar. Honelako motiboak asko ziren, bai serioak eta baio barregarriak.

Azkenik, bertsolari arteko desafioak ere ez ziren gutxi, gehienean bat-bateko bertsoz, baina bai bertso jarriz ere. Bertsolarien artean sorturiko haserreek ere hamaika bertso gordin ekarri zuten. Famatua da Txirritaren eta Fermin Imazen arteko sesioa. Garai hartan bazen ohitura Santo Tomasetan Donostira bertsolariak eramateko, Victoria Eugeniara ere bai. Nonbait Txirritaren esku uzten zuten lagunak bilatzea. Beti edo gehienean Fermini ere

deituko zion. Urte batez, ordea, Txirritak Fermini deitu ez. Honek, deitua izango zen uste osoz, traje berria ere egina zeukan, saio hartako diruz ordaintzeko, eta ezin ordaindurik gelditu zen. Jake berria hartu eta harrika bota omen zuen, esanez: *Zerekin ordaindu behar diat nik orain hau?* Bere amorruan bertso berriak atera zizkion Txirritari eta goiz batez han azaldu zen gizona, Errenterian bertso paperak saltzen. Esan beharrik ez dago Txirritak berehalaxe bihurtu zizkiola ordainak. Gero Imazek berriro eta Txirritak ere bai eta horrela sortu zen bi bertsolarien arteko istilu famatu hura.

Bertso berriak kantatzeko egiten ziren. Gaur bertsoak kantatzeko baino gehiago argitaratzeko egiten dira, edo argitaratzen dituenak badaki apenas kantatuko direla. Aldizkari-egunkarietan argitaratzea eta eskuz esku saltzea sistema guztiz ezberdinak dira. Aldizkarian tokia betetzeko edo ohituraz ere sar daitezke. Txarrenean ere nahikoa da aldizkariko langile bat edo bi hartaratzea, bertso berriak esku askotara heltzeko, gero inork kantatuko ez baditu ere. Baina eskuz esku saldu behar duenak jende asko irabazi behar du eta, asko saltzen ez badu, eskarmentatuko da eta gehiago ez du aterako. Eskuz saltzea, beraz, kalitatearen garantia zorrotzagoa da. Sistema honetan, bertsolariak berak, edo bertsopaper saltzaileak, bertso berriak kantatu egiten zituen. Non? Jendea biltzen zen tokietan, azoka, erromeri eta abarretan. Kantatze hori propaganda bat bezala zen, gero gehiago saltzeko.

Bertso berrien edo bertso jarrien nostalgia daukatenak ez dabiltza oker, oso tradizio ugaria eta aberatsa izan baita. Hala ere gauza batzu bereizi beharra dago. Sarritan bertso jarriak, pertsonalak zirenean batez ere, oso krudelak eta gordinak ziren. Denbora joanda gero, politak iruditzen zaizkigu, baina garaian bertan ez ziren batere gozoak. Tradizio hori berritzeko gogoa daukanik baldin bada, berari jarriko dizkiogu bertso berriak, kristorenak esanez, ea zer iruditzen zaion.

Dena den, bertso jarrien izpiritua kantatuak izatea zen eta publikuan kantatu ere. Bakarka kantatzeak ez dauka funts handirik. Bertso berriak kantatzea egintza soziala zen. Lehenbizi publikuan entzun, gustatu, ikasi eta gero berriro lagunartean edo publikuan kantatu. Publikuan kantatzeko balio ez zuen bertsorik apenas inork ikasiko zuen. Bertsozaleak bakarka kantatzen dituen bertsoak seinalea lagunartean ere kantatzen dituela edo kantatuko dituela. Jokabide horrek ez dauka konturatua edo jakinez gain izan beharrik. Bat-bateko bertsoetan publikua funtsezkoa da. Bertsolariak ez du bakarrean kantatuko, entrenamentu edo aproba gisa ez bada. Bertso jarriek ere azpi sozial hori aldean daramate.

## BI ADAR

Bertsolaritzak baditu bi adar, bata bezain funtsezkoa bestea: bat-bateko bertsoak eta bertso jarriak. Bertsolari tradizionalengan adar biak landuak izan dira. Are gehiago, gerra aurreko bertsolari handiak bertso jarrietatik batez

ere ezagutzen ditugu. Xenpelarrek, adibidez, nola inprobisatzen zuen apenas dakigun.

Gerra ondoren bertso berrigintza erdi mozturik edo ahuldurik geratu zen. Bertsolaritzak bere osoan iraungo badu, bertso jarrien tradizioa nola edo hala berritu eta indartu beharra dago. Eta hau ez da erretiratutakoan edo denborapasan egiteko lana, bertsolaria aktiboan eta menik onenean dagoenean baizik. Gaur egun badirudi adar hori ber-indartuz doala. Bat-batean izen handia daukaten bertsolariak ari dira bertso jarriak plazaratzen. Hala ere oraindik adar ahula izaten darrai, bat-bateko bertsogintzaren ondoan, nahizta hau bezain garrantzitsua edo garrantzitsuago izan.

Areago oraindik, bertsolaritzaren bideak bertso jarrietatik doaz. Berritasunak esan nahi dut. Bertso jarriak bat-batekoak baino aurrerago joatea normala da. Zerbaitegatik dira jarriak eta landuagoak. Bertso jarririk gabe, bat-bateko bertsolaritza asko txirotuko litzake.

Jenero beraren adarrak izan arren, bat-bateko bertsoen eta jarrien egikera ezberdina da. Edo izan behar luke. Adibide bat jartzeko, Txirritak bertso berrietan tankera berezi bat landu zuen. Hark ez zituen bat-batekoa eta jarriak sistema berdinez egingo. Elkarren antz handiak aitorturik ere, bertso inprobisatuak eta jarriak moldakera edo moldalege ezberdinak dauzkate, bai gaiz eta bai egituraz. Inprobisaturik kantatuko lirakeen antzeko bertso jarriak egiteak ez du gauza handirik balio.

Horrek esan nahi bertso jarrien sailak bere arautegia behar duela eta landu egin behar dela. Gaia eta kalitatea bertso jarrietan beste modu batera eraman behar da. Bertso hauek sortaka izaten dira eta sorta eramateak bere ariera bat dakar. Bertso bakoitzean ere betegarri arruntik ez da onartu behar. Bat-bateko bertsoetan, ordea, onartu ezezik, beharrezko da. Teknikaz eta hizkuntzaz ere bertso jarriek beste maila bat behar dute. Ez gara orain bertso jarrien arautegia zehazten hasiko, baina bai nabarmendu bat-bateko bertsogintza eta bertso berrigintza oso lan ezberdinak direla.

Bertsolari batek, ahalean behintzat, biak egiten jakin behar du, Etxahunek, Udarregik, Xenpelarrek, Txirritak eta abarrek bezala. Bertso jarriak egiteko ohitura landurik ez daukan bertsolariak kantatuko lituzkeen bezalatsu moldatuko ditu, hutsak kenduz eta kalitatea onduz. Ez da, ordea, kalitatea bakarrik. Tankera ezberdinak dira eta ezberdintasun hori igarri egin behar da. Muga zehatzik jarri gabe eta elkarren antz handiak barne direla noski. Bertsolaritza bikoitza da eta bikoiztasun horri tinko eutsi behar zaio. Adarretan bikoitz, enborrean bakoitz.

## GAURKO DIBERTSIO MOLDEA

Lehengo biziera eta gaurkoa oso ezberdinak dira. Beraz, dibertsio moldeek ere ezberdinak izan behar. Beraz, bertsolaritzaren toki sozialak ere aldatu egin behar.

Hasteko, diogun gaurko dibertsioa ez dela egun bakarrean –igandean– biltzen. Orain larunbata igandea bezalakoa da eta ostiral arratsaldeak ere bai askotan. Horrez gainera, aste barruan ere bizitza sozial hura egitea ez da harritzekoa. Urte barruan zubiak eta oporrak ere berritasun funtsezkoak dira gaurko bizieran. Hitz batez, dibertsioa desbildu egin da eta, deskuidatzen bazara, jendea igandeetan aspertzen zaizu gehien.

Bigarren aldakuntza funtsezkoa: lehengo dibertsio moldeko ardatz zen gazteriak orain denbora gutxi egiten du toki berean. Herritik alde egiten du. Beraz, haurrak lehengo molde sozial hartatik at gelditzen dira. Orain euren kontura moldatu behar dute, edo telebistatik zintzilik, lehenago hainbeste maite zuten erromeri inguru hura gabe. Gizon ezkonduak gehiago mugitzen dira, baina emakume ezkonduei ere haurrei bezalatsu gertatzen zaie, batez ere adin batetik gora. Eta zaharrak, tradizioen eta kondairen bozdun zirenak, zer? Hauek oraingo moldean apenas daukaten gazteekin tratatzeko modurik. Lehen erromeri inguruan edo ondoren berez sortzen zen harremana etena da. Zaharrek elkarri kontatu behar gauzak eta gazteek ere ezin zaharren konturik entzun, lehen igandero egiten zuten bezala. Hitz batez, gazteria sakabanatzean lehengo moldea zatikatu da, lehengo herri nukleoa lehertu da.

Eta zer nukleo berri sortzen da? Hor dago istilua. Nukleo berriak oso masifikatuak eta joanetorri handikoak dira. Jendea multzoka dabil atzera-aurrera. Toki berean denbora gutxi egiten da geldi. Nonbait sartuz batera, irtetea pentsatzen eta irtenaz batera, non sartu pentsatzen. Hitz batez, nomadismo anarkikoa. Asko mogitu arren, herri nomadetan herri osoa zebilen hara eta hona, beti batzu eta denak batera. Giza nukleo ibiltari hau bertsolarientzat oso egokia litzake. Gure gizartean, ordea, nomadismo horixe ere oso anarkikoa dugu.

Hizkuntzaz ere gaur koska latza daukagu. Dibertsio tokietan edo dibertsio bideetan, euskaldunak eta erdaldunak nahasirik dabiltza, edo elkarren ondoan behintzat. Zoritxarrez, euskaldunak erdaldunen artean galdurik bezala. Gaurko kafetegietan lau euskaldun baldin badaude, lau bider erdaldun gehiago alboan izango da.

Azkenez, dibertitzen ari den jendea bera ere oso ezberdina edo heterogenoa da, nahizta euskaldun izan. Ezberdina ideaz, ohituraz eta abarrez. Eta batez ere, nahizta dibertsio tokietan ibili, denak ez dabiltza dibertsio giroan. Batzu batzarretik datozela, besteak politikaz ari direla, besteak manifestazio bat komentatzen edo prestatzen, besteek batzokia inauguratu behar dutela eta horrela mila gauza. Lehengo dibertsio eskeman, jendearen arreta eta gogo nagusia dibertitzea bera zen eta horrek ematen zion biltzeari batasun handia, nahizta bestela, ezberdinak ez ezik, sarritan elkar ikusi ezin zutenak izan. Baina oraingo jendetza heterogeno eta multzozko horietan, zer bertsoketa egin beharko litzake? Arina, zorrotza, serioa, politikoa, satirikoa?

Esaten ari garena biltzeko, lehengo bertsogintzak gutxieneko baldintza hauek eskatzen zituen: dibertitzeko gogoa, jendeak toki berean denbora luzea egitea eta jende berdintsua izatea, hizkuntzaz batez ere.

Lehengo dibertsio moldea ala oraingoa ote da hobea? Hori beste kontu bat da. Hemen ez gara balorapenak egiten ari, ezberdintasunak adierazten baizik, eta ezberdintasun horien arabera, bertsolaritza lekutzen. Lehengo moldeak ahalbide batzu zituen, gaurkoak beste batzu. Guztira beharbada gaurko eskemak ahalbide gehiago dauka, bilatzen eta egokitzen jakinez gero. Gertatzen dena gaur hizkuntzarekin daukagula koska larria. Hori ez da bertsolaritzaren gaitza, gaitz zabalagoa eta zailagoa baizik. Euskara lehen ere galtzen ari bazen, euskaldunen nukleoak nahiko trinkoak eta autonomoak ziren. Orain horrelako nukleoak gero eta gutxiago eta bazterrago dira. Euskararen plaza hiria eta gizarte urbanoa da. Hala izan behar du eta horretan ari gara. Baina gizarte urbanoan erdararekin buruz buru bizi behar da, mendean ez esateagatik, eta hori beste soinu bat da.

Guztira beharbada gaurko bizierak ahalbide gehiago dakarrela esan dut. Eta halaxe sinesten dut. Har dezagun bertsolari potentzial bat, figura izateko amorratzen dagoena. Honelakoak, lehen eta orain, praktikatu egin behar du, kantatzeko lekuak aurkitu behar ditu. Hitz batez, plazak behar ditu. Plazak esatean, ez da jaialdi programatuak bakarrik ulertu behar, kobrantza eta guztikoak. Bertso-plaza entzuleak dauden edozein toki da, dela herriko plaza, kale, taberna, gela, autobus, bazkalondo, nahiz edozein bazter. Bertsolaritzan entzulea da plaza.

Gaur plazak nahi dituen bertsolariak edo bertsolarigaiak ez dauka aitzakirik. Lehen baino askoz errezago aurkituko du non kantatu, anbizio apurrik baldin badauka. Alde batetik bertsolariak berak lehengo aldean mugibide handia dauka. Asteburu berean probintzi osoa korri dezake, Euskal Herri osoa ez esateagatik. Ibiltari biziosoa izan gabe ere, gaur edozein gazteren ingurunean eskualde bat baino gehiago sartzen da. Pentsa zenbat herri, handi eta txiki, zenbat auzo, zenbat kale, zenbat jaileku ezberdin pasatzen duen gazteriak urtean zehar. Nahizta lehengo herri guztiz euskaldunak gaur nekezago aurkitu, euskal-guneak asko eta askotarikoak dira. Erdararen nagusitasuna nabarien den hiriburuetan ere gune horiek ugari dira: euskaltegi inguruak, halako tabernak, halako kaleak, halako eskolak, halako elkarteak...

Bertsolaritzak lehenago ez zeukan aktibotasuna dauka gaur: bertsolari elkarteak, –Euskal Herrikoa eta probintzietakoak, euron liberatu eta guzti–, maila guztietako bertso eskolak, haurretarik helduetaraino, sariketak, lehiaketak, txapelketak... Inguruan beti dago bertsolaritzari dagokion zerbait.

Komunikabideek –idatziek, irratizkoek, telebisiboek– lehenago pentsatzerik ere ez zegoen presentzia daukate gaur bertsolaritzan, batzutan saturatzen ari ez ote garen kezkatzeraino.

Oro har, bertsolaritzak gaurko gizartean lehengoan baino prestigio gehiago dauka, gazte artean batez ere. Bertsolariak, nahi badu, ia noiznahi eta nonahi aurki dezake arretaz eta estimuz entzungo dion entzuleria. Inoportuno gogaikarria ere izan daiteke noski, baina hori betiko arriskua da, oraingoa nahiz lehengoa. Bakoitzak badaki zer girotan aurkitzen den eta non

izan daitekeen egoki. Erratzen bada, plazak edo giroak berak emango dio eskarmentua, baina ez da miru-begia izan behar, saio bat jendea haserretu gabe non egin daitekeen antzemateko. Zaratarik modernoena dabilen tabernetan ere hamaika aldiz isilarazi dugu musika –edo bertsolariak ikustean, isilarazi dute–, baita jendeak txalotu eta eskertu ere, kantatzeko borondaterik izan bada. Dibertsio giroan dabilena edozein ezuste onartzeko prest dago, dibertsioa ere gehienean uste baino monotonoago izaten baita.

Gaur kantatzeko aukerak, bai programatuak, bai espontaneoak, lehen baino askoz gehiago dira. Oraingo bizieran eta dibertsio moldean, zaila da kantatzeko aukerarik ezaz kexatzea, plaza ordainduak esan nahi ez bada. Batzutan zalantzan egoten naiz kantatzeko aukera esatean, «kobratzeko aukera» esan nahi ez ote den. *Ez, ez, hi! Nik aritzeko eta trebatzeko esan nahi nian. Ondo pasatzeko bakarrik*. Ba, desinteres horrekin dabilenak ez dauka burua asko nekatu beharrik, plazak aurkitzeko.

Zenbait artek eta kirolek azpiegitura handia behar dute, hura praktikatzeko. Pilotak pilotalekua, futbolak zelaia, antzerkiak antzokia eta hala beste gehienek, baina baldintza horiek ez daude noiznahi eta nornahiren esku. Eta sarritan, azpiegituraz gainera, aritzaile mordoa behar da, jardun bat plazaratzeko. Bertsolariak aski du beste lagun bat eta dozena bat entzule aurrean, hura bertso-plaza bihurtzeko. Ez du zelairik, ez oholtzarik, ez soinu-ekiporik ez beste tresnarik behar. Entzuleak non aurkitu? Santuak aldarean bezain taket egonik, baliteke inor gutxi hurbiltzea erregutzera. Zergatik ez norbera mugitu? Entzuleak erakartzea baino errezagoa izango da norbera haien artera sartzea. Zuhurtasun minimo batekin, arrakasta segur dago.

Honek guztiak, jakina, halako ekimen bat eskatzen du norbere aldetik. Adin batzu –haurrak eta gaztetxoak– oraindik ez dira ekimenak norberez garatzeko gai. Inork ekar-eraman behar ditu eta tokian jarrita ere, ez daukate jardunak eskatzen duen antolamenik. Nagusiren batek atondu behar dizkie aukerak, irakasleak, monitoreak edo dena delakoak. Besteek, gazteek eta gorakoek, ez lukete inor behar, euren ohizko ibileran nahi aina plaza aurkitzeko. Gogoa eta anbizio pixka bat daukanak gaur Txirritaren garaian baino bitarteko eta aukera gehiago eta bariatuagoak dauzka.

## LEHENGO ETA ORAINGO ENTZULERIA

Lehengo entzuleria esatean, ez dugu hain antzinakoa esan nahi. Gerra ondoko bertsozalea hortxe sartzen da gehien bat. Bertsozale hauek eta Xenpelarren garaikoek ez daukate hainbesteko alderik. Beraz, oraingo entzuleria esatean, duela hogeita hamar bat urtetik honantz sortu dena edo sortzen ari dena esan nahi dugu.

Lehengo entzuleriaren ezaugarri nagusia berdintsua edo homogenoa izatea da. Orduan ere izango ziren ezberdinak, ideologiaz, jatorriz, hizkuntzaz,

edukiz edo dena delakoz. Baina gehiengoa berdintsutasun horren barruan zebilen. Alde batetik hizkuntzaz berdintsuak, hots, erdal munduarekin gehiegi nahasi gabeak. Nekez izango zen erdaldun askorik aurrean. Honek ez du esan nahi orduan erdaldunik ez zegoenik, bertsolariak gehiengoa euskalduna zen lekuan kantatzen zuela baizik.

Bestetik, lehengo entzulea ideologiaz ere berdintsua zen, edo behintzat ideologien konfrontaziorik ez zegoen entzule artean. Egonda ere, bertsolariari ez zitzaion arlo horretan sartzerik eskatzen. Baina egon ere apenas zegoen, bertsolarien entzule mailan behintzat. Idea aldetik entzule hark ez zeukan eskari zorrotzegirik. Alde horretatik hura konforme uztea ez zen hain zaila.

Gainera gehienean bertsolaria entretenigarri gisa eramaten zen, gozamen bat hartzeko, dibertsio bezala eta dibertsio zabalago baten barruan: jaiak, lagunarteak, erromeriak, afariak, sagardotegiak eta abar. Gai aldetik, beraz, ez zegoen problema handirik.

Oraingo entzulea hizkuntzaz ez da hain berdintsua. Maiz kantatu behar izaten da erdaldunak aurrean diren tokian. Erdal giroa den tokietan ere bai. Euskaldunak izanik ere, euskaraz hain ondo ez dakitenak bat baino gehiago izango dira entzule. Euskaraz ikasten ari direnak milaka dira eta euskaldun berriak ere ez gutxi. Horietarikoak ia bertso saio guztietan daude.

Gaur entzulearen heterogenotasuna ideologian dago batez ere. Oraingo bertso saioetan abaniku guztia dakusu aurrean: alderdi politiko ezberdinak, antinuklearrak, ekologistak, feministak, amnisti batzordekoak, preso ohiak, kiroltzaleak, gazte rockzaleak, plazara zerbait ikustera inguratu diren amamak, bertsolariak entzutera etorritako agure burusoilak... Denerik zerbait.

Normalean entzule berdintsua hobeto datorkio bertsolariari, era batekoa nahiz bestekoa dela. Orduan badaki zertara egokitu behar duen, badaki aurrean zer jende daukan. Denerik dagoenean, ez da erreza denengana iristea. Hala ere, entzule ezberdintsu hau gero eta ohizkoago da eta bertsolariak ez dauka heterogenotasun horretara egokitzeaz beste biderik.

Entzule radikal samarrak ere badira. Kopuruz gutxiago izan arren, hauen eragina handiagoa da, ekileago eta oldarkorrago baitira. Edo ez dira hain konformakor. Bertsozale tradizional adintsuak nekez eskatuko dio konturik bertsolariari, berak nahi edo uste zuen gauzarik kantatu ez badu ere. Eta konturik hartzen badio, mantsoago egingo du, zorroztasun gehiegi gabe. Entzule ekintzaileak, ordea, nekezago barkatuko du, bere ustez garrantzitsuak diren gaiak saioan aipatu ez badira. Laster esango dizute: «Zer, mutilak? Presoak zer? Intsumituak zer? Hauteskundeak zer? Arazo nuklearrak zer?...» Eta abar. Honelakoen eragina handiagoa da, enfrentatzea hautatzen ez bada, eta hori bertsolariak nekez egingo du.

Entzule mota honek bertsoaren izateari ez dio hainbeste garrantzi ematen. Zer esanari adiago dago, nola esanari baino. Lehengo entzuleak, ordea, ideiei ez die hainbeste begiratzen, baina bertsoaren egituran nekez engainatuko duzu.

Oraingo entzulerian, beraz, heterogenotasun ugari hori aldez aurretik jo beharra dago. Errezago al da? Zailago al da? Ezberdina da. Oso ezberdina. Bat beharrean, entzuleri berdintsua nahiago nuke. Era batekoa nahiz bestekoa, baina antzeko samarra. Hori aurrerantzean zaila izango da. Entzuleri nahasiaren aurrean kantatzera mentaldu beharko. Horretan bertsolaritzaren ingurua ez da gutxi aldatu.

Baina aldakuntza horrek txar baino on gehiago dauka. Gaurko entzulea, oro har, lehengoa baino askoz jantziago dago, askoz eskolatuago baita. Eskola akademikorik ez daukan bertsozale klasikoak ere orain askoz informazio gehiago dauka, komunikabideei, etxean edo inguruan entzuten duenari eta biziera mugituagoari esker. Bertsolariak edozein gai edo gai baten edozein trataera lehen baino lasaiago proba dezake, arrotz gertatzeko bildur gabe. Hitz batez, irudimena askoz libreago eta zabalago erabil dezake. Hori aldeon handia da, lehengo entzuleak markatzen zuen bide estu samarraren aldean.

# II

# BERTSOLARITZAREN BARNEGUNEA

**BERTSOLARIA BERA:** Diodan, hasteko, entzuleekin batera bertsolariaren beraren izatea ere asko aldatu dela lehendik, eskolaren bitartez batez ere. Gaur gehien dabiltzan bertsolaririk gehienak karreradunak dira, unibertsitatetik pasatuak edo pasatzen. Horretan bertsolaria entzuleen bataz-bestea baino gehiago aldatu da. Nahizta oraindik bertsolari klasikoaren eta modernoaren ereduak koexistitzen diren, laster mota bakarra geldituko da. Horrek ez du esan nahi bertsolariak berdinak izango direnik. Areago oraindik, gaurko bertsolari ereduan diferentea izateko modu gehiago dago bertsolaritza klasikoan baino, eskolak eta gainerako informazioak ematen duen esparru zabalagoagatik hain zuzen.

## ESAERA, TESTUA, KOPLA, BERTSOA

Bat-batekotasuna ez da bertsolaritzari bakarrik dagokiona. Hau inprobisatzeko era bat da, aurreko beste mota batzuren eboluziotik datorrena. Inprobisazioa buruz ikasia ez den guztia dela esan dezakegu. Beraz, hizketan ari garenean ere, maila bateko inprobisazioan ari gara. Ez dugu dena asmatzen. Hitzak eta hizkuntza eginak daude. Kontzeptuak eta irudiak ere gehienean eginak erabiltzen ditugu. Baina ordenatzeko eta une bakoitzera ekartzeko modua beti da berria. Berritasun hori agorturik ageri denean, hizketa monotonoa dela esan ohi dugu. Beraz, monotonia osotik berritasun edo orijinaltasun osora bide amaigabea dago. Hori prosan ere gertatzen da.

**ESAERA:** Hitz multzo batek halako tankera berezia hartzen duenean, esaera bihurtzen da. Honek, gama baten barruan, halako luze-labur bat dauka. Gutxienez bi hitz behar ditu: *Saldua galdua, urrea urri, ezjakina ausart, duenak*

*badu* eta horrelakoak. Hitz bakarrez ez dago esaerarik osatzerik. Eta gehienez zenbat? Goi zehatzik ez dago. Baina hitzetatik joez gero, dozena erdiren baten inguruan ibiliko da eta dozenatik behera beti ere. Esaldika jota, pare batetik gora nekez iragango da. Esaldi bakarrekoak: *Otsoak ez du otsokirik jaten. Astoak mandoari belarrihandi* eta abar. Esaldi bikoak: *Dagoenean bonbon, ez dagoenean ego. Egiten baduzu sua, ikusiko duzu kea* eta horrela.

Esaerak, bere laburraz gainera, adierazkorra izan behar du. Irudiren bat, konparazioren bat, hitz jokoren bat, kontrasteren bat. Zerbait bizia, beste zerbait biziki adieraztekoa. Horretan mota guztietarikoak izango dira, txantxazkoak, samurrak, serioak... Sarritan esaera errimatuak izango dira. Honek esaerari beste faktore bat ezartzen dio, gogoan hobeki sartzen lagundurik: *Dagoenean bonbon, ez dagoenean egon. Eros astoa eta beharko duk lastoa.*

**TESTULARIA:** Bi esaldiko esaeren antzekoa da testua edo ditxoa esaten zaiona. Horretarako abildadea daukanari testulari edo ditxolari deritzo. Testua esaeraz beste mota bat da, baina luze-laburrean esaera errimatuen antzekoa. Nor da testulari edo ditxolari? Hizketa errimatuz eta graziosoz erantzuteko talentua daukana. Fernando Amezketarrari txakur txiki bat zaunka eta zaunka ari omen zitzaion. Fernandok emakumeari galdetu zion:

—Nola du txakur honek izena?
—Pitxita.
—Egiten al du putzik ipurdia itxita?

Honela erantzuteko zaletasuna eta trebetasuna daukanari testulari esaten zaio. Testulariak gehienean erantzun bakarra ematen du, errimaturik, baina neurtu eta kantatu gabe. Zaletasun hori euskaldunen artean oso zabala izan da eta badira honela eginiko berriketa osoak. Testulariak ez direnak ere ezagutu ditut, berriketa luzeak horrela eginez edo egiten saiatuz. Elkarri erantzunez, errimak amaitu arte. Jolas bat bezala. Umetan, helduen solasak entzutea gustatzen den adin horretan, maiz entzuten genituen horrelakoak, tabernatik etxerantz batez ere. Trebetasun horretan nabarmentzen denari testulari esaten zaio. Dudarik gabe inprobisazioaren arloa da hau.

**KOPLARIA:** Koplaritzak testularitzari beste faktore bi ezartzen dizkio: kantua eta neurria. Kantatzeko, neurtu beharra dago. Neurri hori ez da beti zehazki matematikoa izango, baina gehienean finkoa da, silabaren baten gorabeheran. Beste alde bat ere badu testularitzari buruz. Hemen bi lagunek parte hartzen du. Testulariak beste noribait erantzuten dio. Biak testulariak badira, elkarrizketa errimatua izango da. Koplariak berak egiten du dena. Berak egiten eta kantatzen ditu koplaren bi puntuak. Koplak gehienean bi oineko errima darama, hiru ere bai inoiz, baina hauek gutxiago dira. Mota hau oso zabaldua izan da Euskal Herrian, trikiti eta eske koplek (Gabonak, Santa

Agedak eta abar) adierazten dutenez. Koplaritza oso mota berezia eta nortasun handikoa da. Hona bi oineko kopla batzu:

– Turruku truku truku
ez niri ikutu
ama ganbaran dago ta
sentituko gaitu.

– Oilarra jaikitzen da
goizean goizik
ez daki besterikan
kukurruku baizik.

Hiru oinekoak:

– Errekaldean lizarra
hari begira izarra
etxe hontako nagusi jaunak
urre gorrizko bizarra.

– Mendi altuen edurre
bota surtera mukurre
alaba galanten amak
mutil zantarren bildurre.

Koplaritza inprobisazioaren arlorik handienetarikoa izan da. Gehienean koplak buruz kantatzen dira, baina koplaritza inprobisazioa ere bada. Santa Ageda eskean, esaterako, koplariak ate bakoitzean zerbait berria asmatuko du, zer ikusi, hura koplatuz.

**BERTSOLARIA:** Koplaritzaren eboluziotik bertsolaritza dator. Bi kopla elkarren gainean jarririk, bertso bat osatzen dute. *Arin-arin* koplak edo *porrusalda* zortziko txikiaren neurrikoak dira. Zortziko txiki erdi bat bezala. Edo alderantziz esanik hobeki, zortziko txikia kopla txiki doblea bezala da.

Turruku truku truku
ez niri ikutu
ama ganbaran da da
sentituko gaitu.

Ama ganbaran eta
aita suetean
neska-mutil alperrak
eskilarapean.

Hona hemen bi kopla elkarren gainean jarriak. Errimaren ezberdintasuna kenduz gero, zortziko txiki garbia. Fandango koplak luzeagoak dira eta sarritan hiru oinekoak. Ia zortziko handiaren egitura daukate. Hona hemen bat:

Egun da Santi Mamina
benetan egun samina
goiko zeruan gorde dezala
luzaro bere arima.

Lehenengo bi puntuek zortzina silaba daukate, zortziko handian lerro errimatuak bezala. Bigarren partea zortziko handiaren puntu bat bezalakoa da, lehen lerroak hamar silaba eta lerro oindunak zortzi dituela.

Esaten ari garen jauzia kopla txikitik zortziko txikira argi ikusten da. Badira hemen, bai zortziko txikian eta bai zortziko handian, gauza aipagarri batzu, doinuei begiratzen badiegu.

**DOINUEN AITORMENA:** Bertso doinu zaharrek edo tradizionalek egitura bikoitza nabarmen dute. Ahapaldiaren lehen erdia eta bigarren erdia doinu berbera dira. Doinu bera bi aldiz errepikatua. Bigarrenez kantatzean, hots, ahapaldiaren bigarren erdia hastean, barazio bat eragiten zaio, berdinatsuna hausteko. Baina bestela, doinu bera dira, bi kopla jarraian kantatuak bezala.

Zortziko handietan ere doinu beraren errepika berdina dago bertsoaren bigarren erdian, zubitzako apaindura hori eginik. Bertso doinuetatik, beraz, argi dago bertsolaritza koplaritza doblatua bezala dela. Horrek ez du esan nahi bertsoa kopla doble bat denik. Izango zen garai bat, –eta ez hain antzina–, koplaritzatik bertsolaritzarako iragaitzan, bertsolaritzak oraindik nortasun eginik eta berezirik ez zeukana. Baina doblatzeak edo luzetasunean aldakuntza handi hori sartzeak izatean edo funtsean ere ezberdintasuna ekàrri zuen. Horrela bertsolaritza eta koplaritza bi mota berezi eta ezberdin dira, bi alor ezberdin, kidetasun handiekin bada ere.

Luzetasunari buruz, esan dezagun bertsolaritzaren arau ohizkoa lau oinetik gora dela eta gutxienez hiru. Koplaritzan ohizkoa bi oinekoa da eta goia hirukoa. Badira animali txikiak, erdibitzean kide berdin bi sorrarazten dituztenak. Landareetan nahiko normala da hori. Koplaritzari ere berdintsu gertatu zitzaion, baina kasu honetan sortu zen izaki berria ez zen berdina, jenero ezberdina baizik. Bertsoa, bere espazio luzeagoari esker, diskurtsiboagoa da. Ideak azaldu eta garatu egin daitezke eta, hala ez bada, betelan bat egin behar da. Koplaritzan ez dago horretarako tokirik. Osagaiek soil eta biluz joan behar dute. Hitz eta idea minimoz lortu behar dira efektu guztiak, rotazio gisako errepika funtsezko dutelarik. Horrela, silaben kopuru materialean, kopla bat bertsoaren erdia dela esan badaiteke ere, jeneroz eta estiloz oso izaki ezberdinak dira, hamar urteko haurra hogei urteko gaztearen erdia ez den bezala.

Bertsolaritzak zabalkunde eta erro handirik eduki ez duen tokietan, bada zer bitxi bat, oraintsu arte gertatua: bertso bat kantatzean, lehen bi oinak alde batera eta bigarren biak bestera errimatzea. Bidezko iruditzen zaie hori. Bizkaiko bertsolari txapelketak hasi zirenean, –beraz, duela berrogei urtetik honantz–, baziren hala errimatzeko ohitura zeukatenak, beste era batera izan behar zuenik pentsatu ere egin gabe. Ez zen laurak errimatzeko gai ez zirelako, halakoxe buruera zeukatelako baizik. Baliteke laurak berdin errimatzeko erreztasunik ez edukitzea, euren bururik sekula hartara jarri ez zutelako. Hori beste kontu bat da. Hemen buruerak agertzen ari gara. Horrela errimatzeko ohitura zeukanak seinalea koplari pentsakera zeukala. Gaur ere horrelako buruak bat eta lau baino gehiago izango dira, bertsolaritza orain Euskal Herri guztian nahiko ezagun bihurtu bada ere.

Atal hau bukatzeko, diogun progresioa honela doala: hitza-esaldia-esaera-testularitza-koplaritza-bertsolaritza. Gaur denek diraute eta denetik daukagu. Maila batetik bestera eboluzionatzeak ez du aurreko maila galdu denik esan nahi. Gorago Fernandoren testu bat aipatu dugunez gero, badakigu hura testulari trebea zela. Baliteke koplaria ere izatea, horretaz gehiegi ez dakigu baina. Badakigu bertsolari bikaina izan zela. Dena dela, bi arlo edo jenero ezberdin dira eta baliteke bertsolari on bat koplari txarra izatea eta koplari on batek bertsolari ezin izatea.

## HITZA JOKO TRESNA

Bi kirol mota daude, batzu lanetik sortuak eta beste batzu irudimenetik, lanarekin zerikusi hurbilik ez daukatenak. Gure herri-kirolik gehienak –beste herri batzutan ere bai– lanetik harakoak dira, hots, lanerako tresna berak erabiltzen dira kirol eta jokorako. Haizkora lan tresna da, berdin arrauna, sega eta abar. Baita animaliak ere. Haizkora bera da lanerako zein jokorako, nahizta jokorako ahalik haizkorarik onenak erabili. Honek ez du funtsik aldatzen. Lanean ari dena haizkolaria da eta jokoan ari dena ere bai. Lana utzi eta tresna bera hartzen da jokorako, lana imitatuz eta horretan elkar neurtuz. Era honetakoak dira haizkolariak, arraunlariak, segalariak, idi-demak eta beste dema guztiak.

Harri jasotzea ere sail honetan sartzekoa da, lanerako behar den karga-indarra hartzen baita kirolerako ere. Mota guztietako korrikariak ere hemengotzat jo daitezke, ibiltzea –oinez, bizikletaz, motoz, autoz...– lanerako eta bizitzeko beharrezko baita.

Beste sailean kirol asmatuak daude, halanola pilota, futbola, saski baloia eta abar. Herri bakoitzean edo herri sail bakoitzean kirol ezberdinak asmatzen dituzte eta kirol bakoitzak zaletasun ezberdina dauka han-hemen. Lanetik harako kirolak ere komunak ala ezberdinak izan daitezke, segun toki bakoitzean zer lantresna eta biziera daramaten.

Hauek honela, hitza ere lanerako, bizitzeko, elkar harremantzeko behar den tresna dugu. Lantresna hori, molde edo arau batzu ezarrita, jolaserako eta jokorako erabiltzea, horixe da bertsolaritzaren alderdi funtsezko bat. Hitza kantatzen, neurtzen eta errimatzen hasten garenean, lanetik jokora pasatu gara. Horrek ez du esan nahi jokatzea lana ez denik edo kostatzen ez denik. Bai alajaina. Eta batzuren jokoa bera bilakatzen da lan eta lanbide. Baina, oro har, jokoa beti izango da lanaz beste zerbait, publikuarentzat batez ere.

Azaltzen ari garena, labur esanda, hauxe da: gizakien bizitzan hitza beharrezko da lanerako eta elkar komunikatzeko. Hitz neurtuz eta errimatuz kantatzen dugunean, horixe da bertsolaritza.

Orain sar gaiten jokoan, jolas gaiten hitzarekin. Gutxi gora behera esan dezagun horixe bertso batean. Erabaki hau hartzen dugunean, jokoan sartzen gara. Hona bertso posible askotariko bat:

Hizketan lerratzen da
gizonen bizitza
jolas edo jokoan
pozago gabiltza.

Neurriz eta errima
kantatzea hitza
horra zer kirol mota
den bertsolaritza.

Jokatzen ari gara eta joko posible asko dago hemen: esateko bera beste bertso batez esan; bertso ezberdina, baina esanahi bera. Modu bat oinak aldatzea da. Orduan guztiz bertso ezberdina ateratzen da. Beste era bat errima berarekin bariazioak egitea da. Hona errima aldaturik:

Hitza asmatua da
gu jaio baino lehen
jolas edo jokoa
ere hala omen.

Hitza neurri-errimaz
kantatu ondoren
horra bertsolaritza
zer kirol mota den.

Errimarik aldatu gabe gauza berdintsua esan daiteke:

Hizketan ikasi dut
lanean baino lehen
jolas edo jokoa
maitagarri omen.

Hitza neurri ta errimaz
abestu ondoren
jakingo duzu lan hau
zer dibertsio den.

Beste joko mota bat liteke, aldez aurretik esankizunik gabe, oinak hartu eta haiekin zerbait osatzea. Horrela, esaterako, lehen bertsoko lau oinak hautatuko ditugu: *bizitza, gabiltza, hitza, bertsolaritza*. Hona oin hauekin bertso posible askotariko bat:

Beti penaz urtzeko
ez baita bizitza
txori kantari gisa
han-hemen gabiltza.

Haizeak eramaten
ez badigu hitza
mendez mende biziko
da bertsolaritza.

Zertan ari gara? Jolasean, jokoan ari gara. Lantresna edo bizitresna zen hitza jolas edo joko tresnatzat hartu, oztopoak edo gainditu beharreko zailtasun batzu –neurria eta errima– jarri eta jokatu. Haizkolariak haizkoraz, arraunlariak arraunez edo segalariak segaz bezala.

## BEREZITASUNA ETA ORIGINALTASUNA

Bertsolaritzak badu berezitasun orokor bat. Orokortasun horren barruan, gauza asko aipa daiteke, banaka beste mota batzuren kideko edo antzekoak, baina guztiek batera mota berezi bat ematen dutenak. Honela, adibidez, bertsolaritza herritarra, entzulea behar duena, ahozko literaturaren sailekoa eta abar esaten denean, gauza horiek ez dira bertsolaritzan bakarrik gertatzen. Denak jota, ordea, bertsolaritzak jenero berezi bat egiten du.

Baina ez al dago zerbait, bertsolaritzak bakarrean daukana, bere-berea duena eta ez beste ezerena, bertsolaritza funtsean definitzen eta bereizten duena? Bai noski. Zer da hori?

Arte motarik gehienetan, denetan ez esateagatik, bi une guztiz berezi eta ezberdin daude: 1) *Sortu* edo *kreatu*, 2) *Interpretatu*. Kantariak, esaterako, lehenengo une batetan sortu egiten du. Une hori bakarrean egiten du. Bakarrean edo elkarrekin, baina ez jende aurrean. Bigarren unean, denboraz eta tokiz oso urrun eta bereizirik, jende aurrean interpretatzen du.

Hona, ordea, bertsolaritzan bi uneok bat bera direla, alegia, sortzea eta interpretatzea era batera egiten direla. Sortzen ari den unea bera da interpretatzen ari dena. Honek arte motaren egitura eta egilearen psikologia guz-

tiz aldatzen ditu. Jende aurrean barruz kanpora, biluzik jartzea bezala da. Kantariak, sortzen ari denean, biraoak bota ditzake, ateratzen ez bazaio. Jauzi egin dezake, ondo ateratzen bazaio. Batzutan amorraturik, beste batzutan pozik ariko da, segun lana nola ateratzen zaion. Baina nolanahi ere bakarrik dago. Garagarrak egin nahi baditu ere, inork ez dio ezer esango. Horixe da bertsolariak ezin duena, sortzen duena entzuleen aurrean sortzen baitu. Jendea haren estuasuna edo lasaitasuna ikusten ari da. Horrek, gorago esan bezala, mota eta psikologia guztiz azpikoz goratzen eta aldatzen ditu.

Beste arte mota batzutan, bi uneak ezberdinak izanez gainera, pertsonak ere ezberdinak izan daitezke. Batek musika sor lezake eta besteak interpreta. Antzerkian, musikan eta abarretan ere, egilea ez da gero interpretea izaten.

Kirolean ere bi uneak bat dira, hain zuzen sortze huraxe baita ikuskizun. Kirola jende aurrean ikuskizuna da eta jende gabe jolasa. Honetan, kirolak ikusle gabe ere badauka bere justifikazioa. Galde bestela haurrei eta gazteei, pilotan edo futbolean ari direnean. Bertsolaritzak badu kirol alderdirik, baina gutxiago eta nekez justifikatzen da entzule gabe. Talde oso bat bertsotan jardun liteke, baina hau ez da normala eta bertan ere entzule bat baino gehiago izango da. Besterik da lagun batzu elkarrekin entrenatzea. Kirolean bezala, hemen ere jokatzea eta entrenatzea ez dira berdin.

## INPROBISAZIOA EDO BAT-BATEKOTASUNA

Oker handia litzateke inprobisazioa Euskal Herriko pribilegioa dela pentsatzea. Ezjakintasunak edo etxeko miseriak izkutatu nahiak eramaten du topiko harro horietara. Baita oker handia litzateke inprobisatzeko modu bakarra bertsolaritza dela pentsatzea ere. Inprobisazioa hizkuntza eta kultura guztietako osagaia izan da eta da. Eta beharbada kulturen primitibotasuna eta inprobisazioaren garrantzia korrelatiboak izan dira.

Hizkuntza eta kultura guztietan inprobisatzen da. Batzutan, batez ere hizkuntza teknifikatuetan, inprobisazioa, literatur mota berezi bezala, galdu edo ahuldu egin da. Eta behin galduz gero, nekez berreskura daiteke, itzulgaitza baita.

Inprobisazioa, batez ere ahozko literaturaren atal denez gero, ahozko literaturarekin paretsu doa. Noiz dauka indarra ahozko literaturak? Literatura idatziak eta bisualak –telebistak eta zineak– irentsi arte. Literatura idatzia ez da hain antzinako gauza. Mendebaldeari dagokionez, hor ditugu Ekialde hurbileko zibilizazioak: Babilonia, Egipto, Israel eta abar. Gero Grezia eta Erroma eta horrela gureganaino. Kultura hauetariko zaharrenak ere, duela bost mila urte ingururarte ezagutzen ditugu. Zer dira bost mila urte gizateriaren historia luzean? Literatura idatzia heldu arte, herriak eta kulturak ahozko literaturaz moldatzen ziren.

Literatura idatzia bera ere oso mugatua eta minoritaria da, inprenta heldu arte. Gorago aipaturiko kultura guzti horietan, literatura idatzia, pergaminoak eta abar, oso esku bakanetara iristen ziren. Beste guztiek hori zer zen ere ez zekiten. Guretzat ilargira ehizan joatea bezala.

Inprenta, esateko, atzo goizekoa dela joez gero, pentsa zer proportzio kaxkarra dagoen literatura idatziaren alde munduaren historian. Baina inprenta zabaldu eta gero ere, ez uste denak horren inguruan zebiltzanik. Mende honen haseran, mundu guztia jota, ehuneko laurogeita hamabost analfabetoak ziren. Gaur bertan ere, proportzio hori asko gutxitu arren, analfabetoak alfabetatuak baino gehiago dira munduan.

Alfabetatua izatearen minimoa irakurtzen eta idazten jakitea baldin bada, gauza bat da jakitea eta beste bat praktikatzea. Alfabetaturik gehienek zertxobait irakurtzen dute, baina idatzi ia bat ere ez. Hori ez da literatura idatziaren hesparruan bizi direla esateko aina. Zerbait erregular samar irakurtzen dutenak gutxienak dira. Asko irakurtzen dutenak bakan-bakanak eta asko idazten dutenak hatzez kontatzekoak. Hori gaurko proportzioei begiraturik. Munduko historia guztiko proportzioak ateraz gero, ia hutsa. Honek esan nahi du beste gizaki guztiak oraindik literatura ahozkoaren inguruan dabiltzala.

Gertatzen dena da literatura idatziak, gutxienena bada ere, indartsuena dela eta beste guztiak irensten dituela. Honek indarra hartzean, aurreko guztia ezabatzen du edo ezabatzeko arriskua dauka. Transformagailu txiki guztiak agortzen dituen zentral nuklear bat bezala edo abel-indarra baztertzen duen indar mekanikoa bezala. Munduan proportzioz –gaur ere bai– abel-indarra dena izan da. Baina indar mekanikoa sartzen den lekuan besteak ez dauka zereginik, milaka mendetako nagusitasuna kreditatzen badu ere.

Zer gertatuko zen hemen, inprentarekin batera eta inguruko hizkuntza nagusien antzera, –gaztelania, frantsesa, ingelesa– euskara ere garatu eta hizkuntza handi egin balitz? Beharbada Euskal Herriko inprobisazio alorra koplaritzatik ez zen iragango eta agian bertsolaritzarik ez zen sortu ere egingo edo ez zuen honenbeste indar hartuko. Hauek denak aieruak dira. Baina beste hizkuntza hazi horietan ahozko literaturako inprobisazio saila nola baztertuz edo indargetuz joan zen ikusteak zerbait esan nahi du. Bertsolaritzak bere izate zati handi bat euskararen hazkunde urriari zor dio beharbada.

Denok nahi dugun bezala, euskara osoki gara dadinean, bertsolaritza galdu egingo ote da? Hori ere ez dugu esan nahi. Baina bai eraso gogorra jasan dezakeela. Eraso hori gainditiuko ote du? Galerazko prozesu batzu atzeragaitzak direla esan dugu lehen. Bertsolaritzak iraun du, badirau eta iraungo duelakoan gaude. Baditu kultura eta hizkuntza teknifikatuekin batera bizitzeko elementuak, baita lehiatzeko ere. Zuhaitz eroria jaikiaraztea ia ezinekoa da, baina, zutik dagoenari eustea delarik, indar gehiago ezartzea ez da hain zaila. Geroak esango du eta honek gehienean geuk orain egiten duguna esaten du.

Bertsolaritzaren ezaugarri nagusia beharbada inprobisazioa izango da. Bat-batekotasuna esaten dena. Zer da hori? Lehenbizi esan dezagun bat-bate-

kotasuna ez dela bertsolaritzaren esklusiba. Aurrerago esana dugu inprobisazioa gertakari unibertsala izan dela eta dela. Beste arte mota batzutan ere inprobisazioa garrantzizkoa da, hala antzerki mota batzutan, rock edo jazz musikan, oratorian zer esanik ez, arte komikoan, pailazoetan eta abar. Bertsolaritzan, ordea, inprobisazioak portzentaia handiagoa dauka. Hain handia, ezen bere funts eta grazi nagusia inprobisazioan oinarritzen da. Beste motetan bigarren mailako edo lagungarri delarik, hemen nagusi eta ardatz da.

Hauek honela, zer da bat-batekotasun hori? Lehenbizi esan dezagun zer ez den. Bat-batekotasuna ez da noski hutsetik ateratzea. Hutsetik ez da ezer ateratzen. Hasteko, hizkuntza egina dago. Arauak ere eginak daude: neurri, doinu eta abar. Ideiak eta esaerak ere, gutxi gora behera, eginak daude. Horrek ez du esan nahi berririk asmatzen ez denik, asmatuz eta berrituz eboluzionatzen baita. Baina hori funtsezkoa izanik, ez da kopuruz gehien gertatzen dena. Bertsolari on asko izan dira ikasitako neurri eta doinuetatik irten ez direnak. Zerbait berririk asmatzen dutenek ere ez dute egunero asmatzen. Plazako saiorik gehienetan –ia guztietan– molde jakinetan kantatzen da.

Molde jakin horiek esaerak eta ideiak ere harrapatzen dituzte sarritan. Horregatik bertso saio asko entzuten duenari errepika asko dagoela iruditzen zaio. Hori alde batetik monotoniaren ezaugarri liteke, batez ere bertsozale ez denarentzat. Baina kontuz. Errepika beharrezko eta funtsezko ere bada, berez hala delako eta bestela ezin delako ere bai. Errepikatzea ez da beti alderdi negatiboa, oso positiboa baizik. Har kontu kirolean, jokoan ari garela. Pilotan edo futbolean, adibidez, jokaldi on bat errepikatzeak ez du minik ematen, aitzitik ordea, zenbat eta halako jokaldi gehiago ikusi, hainbat hobe.

Zer ez den pixka bat azaldu ondoren, has gaiten zer den esaten. Ez da erreza inprobisazioa zer den zehazki definitzea. Topiko eta mitifikazio asko egon da hor, eta horiek, gauza bikaindu ustez, lardaskatu besterik ez dute egiten. Bertsolaritzak, bere balioa dagoen tokian jarririk, askoz gehiago irabazten du eta askoz tentagarriago eta maitagarriago da, halako misterio lainoz inguraturik baino.

Inprobisazioaren funtsa ulertzeko, gorago esaniko bi uneak bat bakarra izateak, hots, sortze-interpretatzeak batera gertatzeak, giltz handia ematen du, dena ulertzeko. Bertsolariaren aldetik, arau guztiak martxan doala betetzea esan nahi du horrek. Zerbait esan, neurtu, errimatu eta kantatu, dena martxan doala egin behar du, hizketan ari balitz bezala. Hain zuzen, hizketan ari garenean, inprobisatzen ari gara. Hizketa bera, barrutik aztertuz gero, joko harrigarria da. Baina hori, grazi gehiagoz edo gutxiagoz, denon esku dagoenez gero, ez da hain meritugarritzat jotzen. Hitz egiteko egintza harrigarri horri neurria eta errima ezartzen bazaizkio, orduan arras beste gauza bat da. Bi elementu horiek, beste gabe, lilura intrinsekoa ematen diote bertsolaritzari. Hori al zen guztia? Ez da gutxi. Futbolean ere zer egin behar da, ba? Golak sartu. Eta beharbada bat ere sartu gabe bukatu.

Bertsolariengan bi une batera gertatzen baldin badira, ingurunearen edo kantatzen ari den inguruaren aldetik ere gauza garrantzitsua gertatzen da. Kantatzen ari den eta gertatzen ari den unea bat bera dira. Beste era batera esanda, gertatuala kantatzen da. Kantariak, esaterako, kantatzen ari dela, entzulea berotuko du, harrigarririk handienak egingo ditu, baina unea bera ezin du kantuan sartu. Plazan edo lagunartean ikusten eta entzuten ari dena berbertan kantatzea, jendea bizitzen ari den unea eta ingurunea jaso eta une berean kantu bihurtzea, horixe da bertsolaritzaren arrakastabide nagusia. Horixe da inprobisazioaren giltza. Unea eta ingurunea, jakina, mugagabeak, infinituak dira. Ez dago dena interpretatzerik eta gutxiago denen sentimentuak jasotzerik. Baina inguru orokor horretatik zerbait jasotzea eta bidertzea aski da. Hortxe dago hain zuzen trebetasunaren gakoa, puntu edo zertzelada onak jotzean. Hortxe dago oportunoa izatearen grazia.

Hau guztia ez da beti eta guztiz gertatzen, jakina. Unearekiko lotura sendoagoa edo arinagoa izan daiteke. Loturarik ez denean, saio artifiziala dela esaten dugu. Honetan, saio osoa prefabrikaturik eman liteke. Baina laster igarriko zaio. Edo laster etorriko zaio unea eta ingurunea kantatu beharra. Orduan marro egiten badu, laster gelditu beharko du etxean.

Esaten ari garen honek badauka beste alderdi bat ere, funtsezkoa eta korrelatiboa. Bertsolariak, ingurunean kantatzean, zirkunstantzia berriak sor ditzake, entzuleengan kate-erreakzioak eraginez. Orduan entzuleria eta bertsolariak elkarrekikoak dira: aldi berean bertsolariak entzuleari eta entzuleak halaber bertsolariari eragiten dio. Orduan esan genezake unea eta ingurunea bera berritzen dela eta berrituala kantatu eta kantatuala berritu. Hitz batez, horri bertsolaria berotzea eta entzuleak ere berotzea esaten zaio. Kate-erreakzio hori abiarazten denean, bertsolaritzaren funtsik onenean gaude batbateko bertsogintzan. Bertso jarriena beste kontu bat da. Bertsolariak era batera sortzen eta interpretatzen duela eta unea bera gertatuala kantu bihurtzea zer den ulertuz gero, inprobisazioaren funtsa jo dugu.

## KALITATEA

Izan da bertsolaritza arbuiatu duenik, haren kalitateari kaxkar eta arrunt eritzirik. Bada bertsolaritza mitifikatzen duenik ere, haren kalitateari halako misterioak ezarririk. Aurrenik esan beharra dago bertsolaritzak bere kalitate hesparrua, bere egitura berezia daukala eta handik epaitu behar zaiola kalitatea. Ez dago bertsolaritza, adibidez, poesiatik juzkatzerik, alderantziz ere oker legokeen bezala. Bertsolaritzak bere molde estetikoak dauzka eta hortik ikusi behar da bere kalitatea.

Bertsolaritzaren berezitasuna unea eta ingurunea abian harrapatzea eta abian ematea baldin bada, kalitateak ere horretara makurtu behar du. Solasak edo elkarrekiko hizketak, esaterako, zer kalitate dauka? Ez du noski *Hamlet*

antzerkiko elkarrizketen kalitaterik edukiko, oso ezberdina baizik. Baina solasa antzerkia baino beharrezkoago da. Antzerki oso onen kalitatea, hain zuzen, solasa ahalik hurbilkien eta naturalkien adieraztea da. Hain zuzen, solasaren ariera eta estetika nahasian ematea. Tankera honetako elaberriak ere gehiago eta handiagoak dira, *El Quijote* bera lekuko dela.

Demagun, ordea, obra oso landu baten aurrean gaudela. Benetan ederra eta klasikoa esaten zaien horietarikoa, dela poesia, antzerki, elaberri nahiz edozer. Hauek une eta ingurune baten edo batzuren lanketak dira. Gogoeta filosofikoak, barregarriak, sentiberak, tragikoak, edo dena delakoak, baina landuak. Oso ederrak, baina unea eta ingurunea falta dira. Hauek joanak dira. Antzeko uneak ere sortzen ari dira eta milaka sortuko dira noski. Horrexegatik dira obra handiak, hilgaitzak, ingurune eredu bat artistikoki garatu dutelako.

Bertsolaritza beste mota bat da. Unea eta ingurunea edo bizitza bera martxan doala maite duenak bertsolaritza maiteko du. Eta sarritan une horiek oso errepresentatiboak direnez gero, hura ondo kantatzea lortu bada, bertso hilezkorrak atera dira, poesiari edo komediari euren arloan zorrik ez izateko modukoak.

Guzti honetatik ateratzen da bertsoa kantatuz eta entzunez jaso behar dela. Bertsoa ez da irakurtzekoa. Irakurtzen ari denak ere, hala egiten badu, entzuten ari balitz bezala irakurri behar du.

Bertsolaritzan badira *edertasunak* esaten zaienak. Entzun eta *ederra* esaten direnak. Honelako edertasunak nahiko errepikakorrak izaten dira, edertasunaren halako kanon batetan sartzen direnak. Honetan, poesia landua ere oso errepikakorra da.

Modu adierazkor batez esateko, bertsolaritzaren kalitate ona txarra ez izatea da. Txarra ez baldin bada, ona da. Forma aldetik errima, neurri, doinu eta kantaera gaizki ez eramatea, esaera bera edo hizkuntza gaizki ez erabiltzea edo bortxatu gabe eramatea, esaten dena txarra ez izatea –ez zentzu moralean, estetikoan baizik– eta era batera unea eta ingurunea, gaizki daudela ez esateko moduan, inprobisatuz adieraztea, horiek guztiek batera orotasun ona, kalitatea ematen dute.

Uler bedi zer esan nahi dugun. Bertsolaritzaren betekizunak edo mugak hain asko dira –neurtu, errimatu, kantatu, zerbait esan, inprobisatu, eta gainera ez bertso bat edo bi, errezkan baizik–, ezen horixe betetzea bakarrik ere kalitate handia da. Hortik aurrera, beste edozein motatan bezala, kalitateak ez dauka goirik. Bertso batzu ber-unean oso onak izango dira, baina handik kanpo gutxi balio izango dute. Beste bertso batzuk hurrengo unean ere eder izango dira eta beste batzu une oroz harago ere eder jarraituko dute. Gauza polit edo eder edo barregarri bat entzutean, txiste on bat adibidez, gozamen bat sortzen da, baita barrea ere. Baina gauza polit, eder edo barregarri hori norbera tartean edo gai dela gertatzeak beste gozamen arras ezberdin bat

dauka, gehienei gehiago gustatzen zaiena gainera. Hemendik hasi behar da bertsolaritzaren kalitatea baloratzen.

## BERTSOLARITZA, JENERO HERRITARRA

Bertsolaritzak funtsean *herritarra* izatea darama. Herritar eta herrikoi ez dira bat, eta, baldin badira, guk bereiziko ditugu. Herritar esatean, herriak parte handia daukana esan nahi dugu, egile gisa, hartzaile gisa edo ulertzaile gisa. Herrikoi, ordea, herriaren aldeko, herriari buruzko, herria gai duena edo horrelako zerbait litzateke. Hor ez dauka herriak zuzenki parte hartu beharrik. Gauza bat da antzerki herritarra, herri osoak edo herri zati handi batek egina, eta beste bat antzerki herrikoia, herriarekin zerikusi handia daukana, baina gutxi batzuk egiten duten lan elaboratua. Euskal dantza, lehengo erromerietakoa, dantza herritarra zen, herri guztiak egiten eta gozatzen baitzuen. Balleta, ordea, dantza herrikoia izan daiteke, gutxik eta oso landuki egina, nahizta dantza herritarra bera oinarritzat erabili.

Hauek honela, bertsolaritza jenero herritarra dela diogu. Bi alderdi nagusi ditu honek. Alde batetik, jeneroaren beraren ulergarritasuna. Bertsolaritzaren azalak eta mamiak herriak ulertzeko modukoa izan behar du. Herria esatean, denak edo gehienak esan nahi dugu. Eta nola oraindik denak edo gehien horiek ahozko literaturan dabiltzan, bertsolaritzak euskaraz hitz egiten duen edonork ulertzekoa izan behar du. Aski da hitz egiten jakitea, bestela ezjakin hutsa bada ere. Bertsolaritza, beraz, hizkuntza mintzatuaren hesparruan dabil.

Horrek esan nahi du hizkera herritarra edo herriaren eskueran dagoena izan behar duela. Lexikoari gagozkiola, herriak ez dakien hitz asko erabiltzen bada, herritasun asko galduko du, nahizta beharbada herrikoitasun handikoa izan. Hitz horiek errimatzen diren oinak badira, are kontu gehiago behar da. Hemen, jakina, euskalkien problema dago. Baigorriko herriak eta Gernikakoak alde handiak dauzkate hitzetan. Hori beste kontu bat da, esaten ari garenik hausten ez duena.

Joskeraz ere, bertsolaritzak joskera herritarraren hesparruan ibili behar du. Poesian bezala, joskera landuegi eta zailegiak ez dira zilegi, oro har behintzat. Beste gauza bat da tarteka norbaitek edo oso gutxik bakarrik jasotzeko moduko esamoldeak egitea. Honetan, esan beharra dago bertsolaritzan estiloak, –neurriak, errimak eta inprobisazioak hartaraturik–, nahiko molde libreak eta bariatuak dauzkala eta herriaren belarrietarako hatzemangarriak. Hizkera herritarrean gaizki emango luketen joskerek bertsoz eta kantatuz ondo eman dezakete.

Esate baterako, hizketan *noiz eraman behar nauzu etxera* esatea normala baldin bada, bertsotan eta kantatuz honelako esaldiak egin daitezke: *noiz behar nauzu etxera eraman* edo *noiz nauzu etxera eraman behar* edo *noiz*

*nauzu behar etxera eraman*. Hizketan normalean bortxatuak edo afektatuak diren esaldiek bertsoz ondo eman dezakete eta herriaren belarriak ere hala hartzen ditu. Neurtu eta errimatu beharraren eskakizunak dira horiek.

Konparazio eta irudimen aldetik ere, bertsolaritzak herriaren eskueran dauden baliakizunak erabili behar ditu. Horrek ez du gauza berririk ez asmatzerik esan nahi, asmatzen dena herriak ulertzeko modukoa izatea baizik. Gauza berri eta handi asko asma daiteke, herriak ulertzeko modukoa. Sail amaigabea dago hor. Hiru osagai hauek –lexikoa, joskera eta irudimena– hizkera egiten dute. Herriaren eskuerako hizkera denean, hizkera herritarra esaten da. Hizkera herritar hau eta ahozko literatura ia berdintzat jo daitezke, ahozko literatura gehienbat herriak egiten duena baita. Beste era batera esanda, hizkuntza mintzatuan egiten dena, horixe da ahozko literatura edo literatura herritarra. Denek dakite mintzatzen eta denek dakiten mintzaera horrek bere hesparrua egiten du, gutxi gora behera hainbeste hitzez, halako joskeraz eta halako irudimenez. Bertsolaritza hesparru horren barruan delarik, definizioz da herritarra. Herriak entzunez ulertzekoa.

Bidezko denez, hesparru horren barruan berritasun guztiak dire posible, alde batetik bertsolaritzak hesparru hori zabal edo alda dezakeelako, eta bestetik herri hesparrua bera ere aldatuz doalako. Beraz, korrelatiboak eta elkarrekikoak dira. Korrelazio hori, ordea, hauts liteke. Proportzio kontua da dena. Zer proportzio behar da jenero bat –jo dezagun bertso sorta bat– herritarra dela edo ez dela esateko? Zenbaki hurbilkor bat emanik, ehuneko laurogei herritar izatea aski litzateke, jenero herritarra dela esateko, nahizta ehuneko beste hogei handik kanpokoa izan. Alderantziz, ordea, ehuneko hogei bakarrik gutxiegi litzateke jenero herritarrean sartzeko, beste guztia hesparru horretatik kanpokoa baldin badu. Non dago muga berezlea? Ez dago. Gauaren eta egunaren arteko muga bezalatsu. Ahozko literaturatik edo hizkuntzatik gehiegi urruntzen bada, bertsolaritza beste zerbait izatera hel daiteke. Bistakoa denez, muga zehatzik ez egotean, tarte oszilakor horrek berritasun mugagabeetarako bidea ematen du, hesparrutik irten gabe.

Azken konparazio bat jartzeko, poesia elektronikoa posible da, poesiak ez baitu nahitaez askok ulertzekoa izan beharrik. Elektronika oraindik oso gutxik menderatzen duen arloa da. Arrazoi berarengatik, beraz, ezinezko litzateke bertsolaritza elektronikoa. Egunen batez, elektronika taberna bezain ezagun eta etxeko egiten zaigunean, bertsolaritza elektronikoa normala izango da. Informatikak daraman abiadan, egun hori uste baino hurbilago egon daiteke.

Bertsolaritzan ezagunago den esaera batez adierazteko, diogun guztia honetan bil daiteke, alegia, bertsoak entzunez batera jatekoa izan behar duela, euskalkien gakoa alde batera utzirik. Egongo da tarteka, bigarrenez edo hirugarrenez entzunda, gehiago gozatzen denik, baina hori araua baino gehiago salbuespena izango da. Eta aurrerakuntzan salbuespena oso garrantzitsua da noski.

**HERRIA BERTSOLARI:** Bertsolaritza jenero herritarra dela agertzeko, bada beste alderdi bat ere, alegia, herria bera ere bertsolari aktiboa dela neurri batez. Honekin ez dugu hauxe besterik esan nahi, hots, euskaldun gehienak edo asko behintzat noizbait saiatu izan direla bertsoren bat egiten. Pilotan zerbait jokatu ez duen euskaldun gizonezkorik ez dagoen bezala, apenas izango den bertsotan ere ahaleginen bat egin ez duenik, mozkortzean bada ere. Ez da, beraz, herriak pasiboki hartzen eta gozatzen duen jeneroa. Herria bertsolari da, pilotari den bezala. Beste kontu bat da banaka *bertsolari* esaten zaiona izatea. Pilotan ere poliki jokatzen askok jakin arren, oso gutxiri deitzen zaie *pilotari*. Herria bertsolari izatea ez da, beraz, erlazio ezkutu edo misteriotsu batzuren bidez gertatzen dena. Bertsolaria bertsoak egiten dituena baldin bada, –zenbat eta nolakoak zehaztu gabe-, hori euskaldunek masiboki egin dute. Hortik herria bertsolari dela biribil esan daiteke. Horixe da bertsolaritzaren herritasunaren ezaugarri nagusia, bakarrean ere aski dena, beste inolako teorizapen gabe.

## ENTZULEEKIKO LOTURA

Bertsolaritzaren ardatz nagusia unea eta ingurunea baldin badira, une horrek eragin ebazkorra duela esan behar bertsolaritzan. Uneari heldurik, ingurune berriak katean sor daitezke, entzuleen barne egoera biderka daiteke, eta horrek halaber bertsolaria ere biderka dezake. Hitz batez, bertsolariak eta entzuleak elkar berotzen dute.

Hori horrela gertatzeko, bertso jardunak bere baldintzak dauzka. Bertsogintza, alde batetik, egintza soziala da, publikoa, rito publiko bat bezalatsu. Horregatik bertsolariak nekez kantatuko du etxean edo entzule bakanen aurrean, entrenatzeko edo horrelako zerbaitegatik ez bada. Jende gutxiren aurrean baliteke benetako giroa eta berotasuna sortzea, beste zirkunstantzia batzurengatik. Honetan zurruta ez da zirkunstantzirik txarrena.

Entzule askoren aurrean ere, baliteke girorik ez sortzea, entzuleak bertsozale landuak ez direlako, edo tartean bertsoen arretarik ez daukan jendea nahasirik dabilelako, edo une ezegokian saioa jarri delako, edo bertsolariak eurak motel daudelako. Egintza edo rito sozial horren baldintza oinarrizkoak hauek dira: entzulea bertsozale izatea edo arrazoiren bategatik bertsoak entzuteko gogoa edukitzea; bertso saioa une sozial egokian jartzea, bai tokiz, bai orduz, bai motiboz. Jendea beste zerbaiten arretaz baldin badago, nekez berotuko da girorik. Hirugarren baldintza interferentzirik ez gertatzea, alegia, entzuleak hartara eta ondo entzuteko moduan egotea eta ez zarata artean edo beste jende batzuren joanetorria bertatik dela eta abar. Azkenik, bertsolariak ere ganoraz kantatu behar du. Gehienean, beste baldintzak betetzen direnean, bertsolariak nahiko erraz konformatzen du entzulea, bertsozalea horretan nahiko harkorra eta jasankorra izaten baita. Bertsolariak bertso

legeak betetzen baditu, eta ez da gutxi, entzuleak nekez esango du saio txarra izan dela, nahizta beharbada berotasunera heldu ez. Legeak beteez gainera, bertsotasuna sortzen bada, entzuleak agudo erantzuten du.

Honetan hala ere, oso entzule ezberdinak daudela esan baharra dago. Toki batzutan, gehiegi entzun dutelako edo gutxiegi entzun dutelako, apenas igartzen den erreakziorik. Beste toki batzutan, ordea, aisa jotzen dute merezi baino txalo gehiago.

Bertsolari-entzuleen elkarrekikotasun honen alderdi berezi bat da entzuleak bertsolariarekin batera bertsoa amaitzea. Azkena igartzea esaten zaiona. Hau sarritan aipatu da bertsolari-entzuleen arteko loturaren adibidetzat. Honetaz badago zerbait esan beharra. Entzuleak azkena igartzea monotoniaren seinale ere izan daiteke. Hori ez dago bertso onaren gailurtzat jotzerik. Izan liteke, bai, ateraldi jenial bat entzuleak aurretik igartzea. Batzutan azken esaldi osoan dator kolpea eta beste batzutan azken hitzean. Esaldi luze samarrak, erdi inguruan doala, bukaera iradoki dezake eta hala igarri. Edo bertsoaren beraren garapenak, halako norabide eta zertzeladak dakartzalako, azkena nahiko argi iragartzea. Kolpea azken hitzean edo hitzetan biltzen denean, zailago da igartzen.

Dena dela, ateraldi orijinala eta berria baldin bada, ez da harritzekoa entzuleak ez igartzea. Zerbaitegatik da berria. Kolperik onenak, bukaera entzunez batera, erreakzio leherkorra sortzen dutenak izaten dira. Azkena errepikatzeko doinua denean, entzuleak bigarrenean aho batez kantatzea, hori bai dela gauza ederra. Baliteke, beraz, kolpe ona eta entzuleak igarria izatea. Baina baliteke kolpe orijinala izatea eta orduan entzuleak nekez antzemango dio. Bertsorik onenak honelakoak dira.

Horrek ez du esan nahi jendeak azkena igartzea txarra denik. Hori gertatzen denean, bertsolariak zerbait handia lortu du entzuleen baitan, kolpe berriegia ez bada ere. Nahi genuen bakarra da puntu honi inoiz ematen zaion garrantzia erlatibotzea. Gainera bertso baten balio nagusia, azkenean baino gehiago, bertso osoan egon liteke, deskribapenean, bide batezko xehetasunetan, esaera oportunoak sartzean, ez-usteko ebokazio batean eta abar. Kasu honetan zentzu gutxi dauka azkena igartzeak, bertsoaren balioa haseratik azkenera baitoa.

Azkenik, aipa dezagun noiznahi entzuten den beste zer bat, goiza baino arratsaldea hobea ote den alegia. Gehienean, goizean burua argiago egoten dela gauza jakina da. Beste gauza bat da norbere gogoa motel ala bizi aurkitzea. Bertsogintza ahalmen mental batzu lantzea eta beste oztopo batzu –lotsa, bildurra, nerbioak...– gainditzea da. Gauza bat da haizkora zorrotz edukitzea eta beste bat eskuak edo gogoa berotu beharra. Kasu honetan janedanak egiten duena, adibidez, ez da burua argitzea. Zurrutak egiten duena oztopo batzu kentzea edo kentzen laguntzea da. Gizona tenplean jarri. Horrela, batez beste, argitasun gehiago gerta liteke edanik, baraurik baino.

Bertsolarien aitormen klasikoa da, bertsotan ondo eta jarein egiteko, muturra berotzea ona dela, batetik zerbait galdu arren, bestetik gehiago irabazten baita.

Honetan bertsolarien izaera bera ere ez da gutxi aldatu. Gaur egun zurrut gabe edo oso neurtuta dabiltzan bertsolariak gero eta gehiago dira. Edanak bakoitzari zer eragin egiten dion, hori da gorabehera nagusia. Batzuk euspen gehiago daukate, beste batzuri errezago trabatzen zaie mihia. Niri sagardo puntu bat ondo datorkit, baina ardoak edo beste edari sendoagoek puntu hori aisa pasarazten didate. Eta biharamonean burukomina. Kontuan izan behar da bertsolarien ibileran, bazkalondo, afalondo eta asko kantatu behar den okasioetan batez ere, edalontziak joanetorri asko egiten duela muturrera, sarritan norbera ohartu gabe, zerbaiti heltzea, erretzea, edatea... eskatzen baitu jardunak. Baina, beste portaera fisiologiko guztietan bezala, alkoholean ere bakoitzak bere neurria dauka eta hura zaintzen ez badu, gorputzak ez dio barkatuko.

Bertsolarien izaeraz eta egoeraz gainera, badago hemen beste gauza garrantzitsuago bat: entzuleria bera. Gorago esandako bertsolari-entzuleen elkarrekikotasunari jarrai, entzuleak asko berotu edo hoztu dezake bertsolaria. Entzuleen erreakzioa funtsezkoa da, baina kanpora azaltzen dena, errakzio ageria, ez barnekoa edo izkutua. Horretan arratsaldeko saioak bere abantailak dauzka. Zergatik? Entzulea bera beroago dagoelako, azkarrago erreakzionatzen eta sentitzen duena aisago agertzen duelako. Bertsolariak bezala, baliteke entzuleak ere burua argiago ez edukitzea, baina hartzen duena nekezago gordetzen du eta aisago erakusten. Bertsogintzan entzulearen tenpleak ere zerikusi handia dauka. Baliteke goizean entzulea hobeki eta sakonkiago jabetzea. Baina hotz baldin badago, kanporantz adierazten ez badu, bertsolaria ere hoztu eta uzkurtu egingo du. Edo gutxienez erantzun beroagoak lukeen bultzadarik ez dio ematen.

Ikusten denez, bertso saioa faktore askoren konbinapena da. Batzuri faktore batzuk gehiago eragiten diete. Baina ondo dago faktoreak bereizten jakitea eta, zeinahi kasutan ere, emaitza globala zenbait faktoreren nahasmenetik datorrela ohartzea. Aukera bat egin behar banu, hauxe eskatuko nuke: norberak goizean kantatu eta jendeak arratsaldean entzun, ondo bazkalduta gero. Baina oraindik bi une urrun horiek batera gertatzeko modurik ez da asmatu. Norbaitek esan lezake: *Hori horrela baldin bada, hago baraurrik arratsalderarte*.

Goiz-arratsaldeen gorabehera nagusia ez dago, ordea, baraurik ala aserik egotean. Inork ez du esan goizean ere baraurik kantatu behar denik. Jan-edanaz beste anitz faktore dago hor, ahalmen mentalen eta psikologikoen artean behintzat. Bertsolaritzan ahalmen horiekin jokatu behar da batez ere. Indarra edo ahalmen fisikoak nagusi diren kiroletan ere egongo da alderik. Faktore horiek idealki konbinatzerik ez dagoeno, zein da hobe, dena jota? Goiza ala arratsaldea ala gaua? Ez dakit zer erantzun.

## BERTSOLARITZA ETA POESIA

Bertsolaritzaz ari garela, nornahik egiten duen galdera da: zer alde dago bertsolaritzaren eta poesiaren artean? Non dago bertsolarien eta poeten arteko muga? Ba al dago egon ere mugarik?

Definizio nahasietan galdu gabe, eta beste munduko zehaztasun misteriosorik ematen hasi gabe, bertsolaritzak eta poesiak badaukate alde handi bat. Bertsolaritza jenero *herritarra* da. Poesiak ez dauka herritar izan beharrik eta gehienean izan ere ez da. Zer esan nahi dugu *herritar* hitzarekin? Hitzetan edo terminologian galdu gabe, azal dezagun mamia.

*Herritar* esatean, herriaren jeneroa esan nahi dugu. Ez noski herritar batzurena, herri osoarena baizik. Herri osoa esatean ere, ez dugu herritar guztiak esan nahi, herritar asko baizik. Herritarren batez-bestekoa errepresenta dezakeen masa bat. Herri masa bat edo jardun masiboa dela esatean, ahozko literatura barruan gaude. Hau hizkuntza mintzatuaren barrutian dabil. Honen barrutia eta hizkuntza idatzi-irakurriena gehienean oso ezberdinak dira.

**HIZKUNTZA MINTZATUA:** Lehenbizi, hizkuntza mintzatua edo ahozko literatura, hitzez edo lexikoz, nahiko barruti jakina eta mugatua da. Zenbaki bat botatzeagatik, demagun hizkuntza mintzatua hiru mila hitzen inguruan dabilela. Jo ditzagun beste pare bat mila, gehigarri gisa, hiztunak ezagutzen, baina noizbehinka baizik erabiltzen ez dituenak. Hizkuntza mintzatua bost mila hitzen ala gehiago-gutxiagoren inguruan dabilen erabakitzeko tokia ez da hau. Dakiguna da hizkuntza guztietan hizkera mintzatuak nahiko barruti mugatua daukala. Eta agian euskarazkoa eta erdarazkoa ez dira berdinak izango, bi hizkuntzen egoera oso diferentea baita.

Lexikoz ez ezik, joskeraz eta irudiz ere, hizkuntza mintzatuak badauka bere barrutia. Barruti horren termometroa herriak edo masa hiztun horrek ulertzeko modukoa izatea da. Horrek ez du esan nahi hitzegile guztiek ulertzekoa izan behar duenik. Ezta esaten den guztia hitzegileek ulertzekoa izaterik ere. Ez dago ehuneko ehunek ulertu beharrik, ezta ehuneko ehun ulertu beharrik ere. Zer portzentaia behar da jenero bat herritarra edo hizkuntza mintzatuaren barrutikoa dela esateko? Ehuneko hirurogei? Ehuneko laurogei? Ez dago portzentaia zehatzik. Baina zerbait esateko, erditik gora ulertzekoa izan behar duela bai. Norbaiti hiztun medioak ehuneko hamar edo hogei bakarrik ulertzen badio, jenero hori nekez jo daiteke herritartzat edo ahozko literaturatzat.

Bertsolaritzaren kasuan, barruti horren barruan ibili beharra argiago dago, entzutekoa baita. Ez da idazteko eta irakurtzeko, bertarik bertara entzuteko baizik. Badira bertso idatziak eta, beraz, irakurtzekoak ere. Edo entzuteko kantatu izanak gero paperean irakur daitezke. Honetan, bertso jarriak eta bat-batekoak ez dira berdinak. Jarriek kalitate hobekoak izan behar dute eta tankeraz ere ezberdinak izan daitezke. Baina beti ere hiztun normalak entzunez ulertzeko modukoak. Zailagoak ere izan litezke, jakina. Arau

zehatzik jartzerik ez dago. Baliteke bizpairu aldiz entzun beharra, ondo ulertzeko. Baina sarritan zailtasunak euskalkitik euskalkirakoak izaten dira, bai hitzez, bai joskeraz eta bai irudiz. Hori beste kontu bat da, esaten ari garenari ezer kentzen ez diona.

Poesia irakurtzeko da eta literatura idatzitik bizi da. Horregatik ez dauka hizkuntza mintzatuari lotu beharrik. Eta gehienean ez zaio lotzen ere. Hizkuntza mintzatuaren barrutiko baliabidez poesia handia eta ederra egin daiteke. Bost mila hitz horiekin poesi mota guztiak egin daitezke, narratibo soilenetik abstrakziorik zorrotzeraino. Irudi, joskera eta beste zenbait elementu sartzean, ahozko literaturatik at kokatuko da.

Poesia, esaniko zentzuan, *herritar* ez izatea ez da inola ere oker bat edo huts bat. Kalitatez ona, jeniala izan daiteke. Baita beharrezko ere. Baina minoritaria, gutxienek ulertzeko eta gustatzeko baliakizunak garatzen dituelako. Alde horretatik, poesia *herrikoia* izan daiteke, herriko gaiak edo herri arazoak sakon eta zorrotz adierazten dituena. Baina ez ahozko literatura barruan dabilen herriak desiratzekoa.

**EBOLUZIOA:** Berriro bertsolaritzara jorik, ahozko literaturaren barrutia ez da beti bera, etengabe estukor edo zabalkorra baizik. Alderdi batzutatik estutuz eta beste batzutatik zabalduz doa. Hitz eta irudi batzu galtzen, beste batzu irabazten dira. Adibide garbi bat jarririk, euskaldunen artean –beste herrietan ere bai– nekazal pentsakerako elementuak –hitzak eta irudiak– galduz doaz, beste arlo batzutarantz zabalduz. Guztira, galtzen ala irabazten ari ote gara? Hori beste koska bat da.

Nolanahi dela, ahozko literaturaren barrutia aldatuz doa etengabe. Horregatik aurrerapena posible da. Baita atzerapena ere. Jenero herritar batek, bertsolaritzak gure kasuon, elementu berriak sor eta sar ditzake. Bi modutan egin dezake hori. Alde batetik elementu zaharrekin konbinapen berriak sortuz eta bestetik elementu berriak sartuz. Lehenengo kasuko adibide bat jartzeko, eman dezagun sekula inork ez duela hau esan: *Ilargia zartagian prijiturik jan zuen.*

Edozein euskaldunek badaki zer den ilargia, zartagia, prijitu eta jan. Lau elemntuok honela konbinaturik, zerbait berria sortzen da, xelebrea, harrigarria, ezustekoa edo nahi dena. Elementu ezagunak zaizkionez gero, edozein euskaldunek ulertzeko moduko berritasuna da hori, beharbada lehen kolpean guztiz jabetzen ez bada ere. Baliteke elementu ezagunekin zerbait berri ulerkaitza sortzea ere, erlazio azalegiak, nahasiegiak edo urrunegi eramanak direlako. Adibidez: *Eskuak zazpi heste ditu, heste bakoitzak zazpina sabel dituelarik eta sabel bakoitzetik zazpina haur ifernurako jaiotzen direlarik.* Hemen ere edozein euskaldunek ezagutzen dituen elementuak daude, baina honelako konbinapen asko egiten duenari hiztun normalak laster seinalatuko dio burualdea, handik nola ote dabilen.

Hona orain bigarren kasuko adibide bat, elementuak ere berriak direna: *Einsteinen erlatibitatea lukainkatu eta txakurrari eman nion*. Hemen lukainkatzea eta txakurrari ematea nornahik ulertzen du, baina euskaldunik gehienek Einstein nor den ez dakite eta gutxiago erlatibitatearen teoriarik. Elementu bat edo bi ez ezik guztiak ezezagunak baldin badira, orduan urrunago goaz: *Einsteinen erlatibitatea eta teoria kuantikoa diglosian daude*. Hemen *daude* ez beste guztiak hiztun ezikasiari arrotz zaizkio.

Baliteke bihar edo etzi gauza guzti horiek ahozko literaturaren barrutian ere ezagunak izatea, jendeak beste eskolapen bat dakarrelako. Baina orduan beste gauza batzu egongo dira barruti horretatik kanpo. Poesia zeinahi barrutitan lasai dabilke, baita barrutiz kanpo ere. Auzia zorrozturik, norberak bakarrik ulertzekoa izatea ere justifika liteke poesian. Gaur norberak bakarrik, bihar bik, etzi lauk eta datorren mendean herri osoak agian. Bertsolaritzan ez dago hori egiterik.

Poesia elektronikoa posible da, poesia abstraktua posible izan den bezala. Eta ederra eta gustagarria izan daiteke. Baina oraindik elektronika saila euskaldunik gehienontzat ezezaguna da, mundua berak badarabil ere. Hiztegi eta pentsakera elektronikoa ahozko literaturan oraindik oso arrotz dira. Bertsolaritza elektronikorik, beraz, ez daiteke pixka batean itxaron.

Honela begiraturik, bertsolaritzak barruti medarra eta ahozko literaturak gauza urria irudi lezake. Ez noski. Barruti horretako elementuz eta baliabidez ahalbide neurrigabeak daude. Barrutia ez da sekula agortzen, besteak beste, beti berritzen ari delako. Ahozko literaturan edertasunaren gailur gorenak jo daitezke. Horrez gainera, herriak masiboki ulertzekoa baldin bada, doble edertasun.

Bukatzeko, esan behar dut nire helburua ez dela poesiaren barrutiak eta definizioak ematea. Horretan ez dut adarrik hautsi nahi. Dakidana eta poesiaren kontrastez azaldu nahi nuena bertsolaritzaren hesparrua da. Hortik kanpora, –eta muga eta portzentaia jakinik jarri gabe-, poesia edo beste zerbait agian hobea izango da, baina ez bertsolaritza. Ez diot hemendik mila urtera bertsolaritza zer izango den, ezer izango bada. Arau eternoen eta oinarri absolutuen gaitzetik aspaldi sendaturik nago. Hemen azaltzen dudana ez da bertsolaritza zer den eta pixka batean zer izango den besterik.

## ZERGATIK ATZEKOZ AURRERA

Nahiko ezagun eta ia topiko ere bada bertsolariak atzekoz aurrera pentsatzen eta osatzen duela bertsoa. Gehienean hori egia da. Bertsolari gehienek horrela jokatzen dute, bat-bateko bertsogintzan behintzat. Eta batez ere asko kantatu behar denean. Honek bere arrazoiak dauzka.

Alde batetik, arrazoi objetiboak edo inprobisazioak berak eskatuak. Batbateko bertsoetan eta asko kantatu behar denean, bertso guztiak aurretik

atzera mamiturik eta gorantz eramaterik ez dago. Ez dago ahapaldiaren puntu bakoitza arrazoi handiz edo kolpe zorrotzez kargaturik eramaterik. Orduan, progresioren bat izatekotan, aurretik atzerantz izan behar, azkena gailurtzat harturik. Horretarako, aurretik *betelana* deritzona egin behar izaten da, bertsoa azkenerantz eramanik. Betelan hori ez da lan hutsa. Izan liteke nabarmenki hutsa, baina berez betelana bertsolariaren trebetasun handietariko bat da. Arrazoi handiegirik esan gabe, haria hartu eta dotore eta bizi eraman, errepika arruntik gabe. Hori artea da eta gehienean entzulea ez da ohartzen betelana egiten ari den ere. Horrela ulerturik, betelana lan handia da, arte handia. Bertsolaria azkena buruan duela kantatzen ari da.

Bertsoak horrela goranzko progresioa eraman behar du. Oro har, bi eratako bertsoak izan daitezke. Batzu indar guztia azkenean kargatzen dutenak. Azken puntua mendikate batean kolpera datorren gailur bat bezala da. Beste batzuk bertso guztian zehar dakarte indarra eta azken puntua ondorio edo biltzaile gisa dator. Inoiz ezin dena da amaian jaistea, azken puntua aurrekoak baino motelago izatea. Orduan bertsoak asko galtzen du.

Bertsolariak segurantza psikologiko bat behar du, bertsoa egiten duenean. Bestela ere nahiko zailtasun badauka bertsoak, nora jo behar duen pentsatu gabe hasteko. Nonbait derrigor bukatu beharra dagoenez gero, hura segurtaturik kantatzeak bertso hobeak sortaraziko ditu. Berez, ezer pentsatu gabe has daiteke, bidean pentsatzekotan. Orduan galdurik ibiltzeko eta galdurik amaitzeko arrisku handia dago.

Badago beste zer garrantzitsu bat ere. Ezer pentsatu gabe hasi arren, noranahi joateko asmoz hasi arren, hori egiterik ez dago, lehen puntuan errima erabakitzen delako. Gero ez dago hura aldatzerik. Eta, jakina, behin errima bat hartuz gero, bidea guztiz estutzen da. Bide estu hori nora jo behar duen pentsatu gabe hartu bada, inora ez joateko bide gerta daiteke. Har kontuan, bien bitartean, neurtu eta errimatu eta zerbait esan behar dela. Gauza guzti horiek egin eta aldi berean hain bide estuan irtenbide on baten bila ekin beharra nahasmen gehiegi da, bertso onik ateratzeko. Baliteke sistema honetan bertso onak eta orijinalak irtetea, baina bertsolarien psikologian, kontuan eduki behar da bertso txar batek ematen duen mina bertso on mordo batek ematen duen atsegina baino handiagoa izan daitekeela. Bertsolariak bertso ona maite du eta horretara doa, baina horren indarra ez dago bertso txarrari dion bildurrarekin konparatzerik. Txarraren kontrako defentsa nagusia azkena behintzat ondo amaitzea da.

Gainera azkena segurtaturik kantatzeak bertso ona egiteko lasaitasuna eta konfidantza ematen du. Gurtoholak jartzea bezala da hori. Gero kargatu eta estutu nahi aina, gurtoholak edo azkenak denari eutsiko diola jakinik. Nola kargatu bestela, azkenean gurkada guztia lehertuko bada? Orduan beherakada nabarmenago geratzen da. Bukaera kaxkarra izatekotan, hobe da aurrea ere berdintsua izatea.

Azkenik, bertsoa entzuteko da, ez irakurtzeko. Entzuleari kantatzen zaio, ez norbere buruari. Orduan bertsolariak jokabide anarkiko samarra badarabil, entzuleak berak errailduko du laster. Nola? Entzuleen erreakzioa bertsoaren azkenean izaten da beti. Erantzun beroa ala hotza azkenean azaltzen da. Jendeak entzun berrien duena azkena izaten da. Hauxe da harengandik hurbilen dagoena eta gehien eragiten diona. Bertsolarientzat ez dago entzuleen hoztasuna baino gauza txarragorik.

Baina jendea berotzen alperrik saiatuko da, bertsoaren azkena kaxkarra bada, nahizta aurretik gauza politak esanez ekarri. Haseran kolpe eder bat jota ere, entzuleari ez zaio interbentziorik tokatzen. Jarraitzen utzi behar dio, salbuespen oso bereziren bat ez bada. Bertsolariak, zerbait igartzen badu ere, ezin du entzuleen barruko erreakziorik nabaritu. Alderantziz, ordea, bidean hotz eta azkenean bero amaitzen badu, entzuleak ere bero erantzungo du. Esana dugu entzulearen erantzuna funtsezkoa dela bertsolarien baitan, bai onerako eta bai txarrerako. Jendearen erreakziorik sorrerazten ez duen bertsolariak gaizki behar du. Eta hori gehienik azken puntuarekin lortzen da. Entzuleak orduantxe adierazten du bere sentipena, txaloen bitartez.

Bertsoa irakurtzeko balitz, berdintsu litzateke aurrean nahiz atzean kargatzea. Gauza ona non dagoen, huraxe irakur daiteke berriro, nahi denean eta nahi aina aldiz. Baina hemen bat-bateko bertsoez ari gara, behin entzuteko eta sarritan haizeak eramateko bertsoez. Bertso jarrietan ez da berdin edo ez luke izan behar. Hauetan nahi duzun bidea har dezakezu, estuena eta nora doan ez dakizuna bada ere. Denbora zeurekin daukazu. Irtenbiderik aurkitu ezin baduzu, heurt egin dezakezu eta ez da ezer gertatu. Horregatik bertso jarrien egikera ezberdina da eta izan behar du, bertsolaritzaren barrutitik irten gabe bada ere.

Hemen inprobisatzeaz ari gara. Errima ugarietan edo norberak konfidantza harturik duenetan, aurrekoz atzera ere egin daiteke. Ez da gutxitan egiten dena, askotan nola edo hala hasi behar izaten baita, nahizta azkenik ez bururatu izan. Baita inoiz bertso ederrik atera ere. Baina bai susto ederrak pasatu ere. Elkarrekin puntuka ari direla, azkenik pentsatu gabe jardutea normala da, baina hori ez da normalena bertsogintza osoan.

Guzti honetatik norbaitek atera dezake bertsolaritzak nahiko jokaera kontserbadorea daukala. Hemen nola den azaltzen ari gara, ez nola izan behar duen. Ez dugu beste era batera izan litekeenik ukatzen. Hala ere, nahiko zaila izango da esaten ari garen hau beste era batera izatea, pixka batean behintzat.

Dena dela, jokaera kontserbadorea iruditzen zaionari konparazio bat jarriko diogu. Alanbre mehe baten gainean eta altuera handian doan orekaria, adibidez. Hura ez da alanbre gainean kalejiran bezala joaten, noranahi begira, jendeari agurka eta bidean zahatotik edanez. Hura bere alanbrean eta helmugan arras kontzentraturik doa. Ikuslea ere isil-isilik dago edo egotea komeni da behintzat. Jokaera kontserbadorea al da hori? Ez noski. Badu hark nahiko lan

eta arrisku alanbre gainean joan hutsez. Mende batzutan kostako da beste era batera joateko erarik egotea edo, balego ere, horretarako gai denik jaiotzea.

Bertsolaritzan era batera neurri, errima, esangai eta dena inprobisatu behar den bitartean, joera minimoki autodefentsibo hori aldatzea zaila izango da. Kontserbadorea barik nahiko abentureroa da alanbre horretan abiatzen dena.

## ZERGATIK ATSEGIN

Bertsozaleari bertsoa gustatzen zaio. Bertsolariari ere kantatzea gustatzen zaio. Zeintzu dira bertsolaritzaren elementu gustagarriak? Zeintzu dira arte-kirol honen ezpal estetikoak? Gauza bat gustatzen denean, gutxiena da zergatik gustatzen den. Zergatik gustatzen zaïk hiri mendia? Zergatik neskak? Zergatik mutilak? Zergatik gaztanbera? Zergatik jazza? Erantzun on bat hauxe izan daiteke: *Nik zer dakit, ba? Gustatzen zait eta kito.*

Izan ere, zergatik gustatzen den jakitea baino gustatzea bera askoz garrantzitsuago da. Arte guztien lege guztiak jakinik, baliteke haietaz ez gozatzea. Hala ere, biak batera joatea normalago izango da. Arte gustuen edo estetikaren arauak ez dira unibertsalak eta betikoak. Ezer gutxi esanik, arte baten estetika gustatzeko moduko elementuak edukitzea dela esan genezake. *Zergatik gustatzen zaidan? Gustatzen zaidalako.*

Gustatzea, beraz, nahiko subjektiboa da eta estetika ere nahiko erlatiboa. Kanon batzuk luzaro irauten dute. Grekoen artea, adibidez, gaur ere gustagarri baldin bada, gizateria hainbesterik aldatu ez delako izango da. Atenasko Partenoia ederra izango da, baina gure Santimamiñeko asabek hartaz zer pentsatuko zuketen jakin nahi nuke.

Ez dago esaterik bertsolaririk gustatzen ez zaiona ez dela euskaldun osoa, inoiz pentsarazi nahi izan denez. Mitifikazioak noiznahi eta nonahi dira kaltegarri, batez ere oraindik gurea bezain maila urrian aurkitzen den kulturan. Euskararen idealizazioak gure pobretasuna eta ezina estaltzeko asmatuak dira. Ez jakinean, baina bai horren eragina nagusi dela. Miseriak, bere burua kontsolatzeko, mitoak asmatzen dituen bezala.

Pilotariak, haizkolariak, igerilariak, trikitilariak eta abar gustatzen ez zaiona ez dago euskaldun osoa ez dela esaterik. Bertsolaritza berdin. Artea den aldetik, ez dago arte guztiak maite izan beharrik. Batzu musikazaleak, beste batzu dantzazaleak, beste batzu bertsozaleak, beste batzu gutxi-asko orozaleak eta horrela.

Bertsolaritza kirol edo joko den aldetik ere, batzuri futbola, beste batzuri pilota, beste batzuri alpinismoa eta beste batzuri bertsoa gustatzen zaie. Baina, bai artez eta bai kirolez, batere ez gustatzetik zale itsua izatera bide handia dago. Horregatik, bat beraren barruan sarturik ere, arteak eta kirolak gehienean ezberdinki maiteak, baina elkarren ondoan bizi direnak dira.

**HIRU OSAGARRI:** Sarrera honen ondoren, zeintzu dira arte-kirol honen osagarri gustagarriak? Bertsolaritzak badu forma edo azal bat, hiru osagarri dauzkana: *doinua, neurria, errima.* Hain zuzen, liburu honen helburu nagusia hiru osagarri horiek sistematzea da. Bertsolaritzaren egitura externoa edo teknika esango genukeena hiru osagarri horietara biltzen da. Bertsoa kantatu, neurtu eta errimatu egiten da. Elementu horiek, banaka harturik, gustagarriak dira. Kantatzea gustagarri da, bertsolaritzari dagokiona nahiko musika xaloa bada ere. Neurria edo ritmoa, bertsolaritzatik aparte ere, gauza bat gustatzeko zer nagusietarikoa da. Eta hizkuntz mailan errima zertan esanik ere ez.

**ZAILTASUNA, ARRISKUA, EMOZIOA:** Kirola den aldetik, berez gustagarri diren osagarriei beste faktore handi bat batzen zaie: zailtasuna. Arte eta kirol guztien azpian dagoena da hori. Horrek emozioa sorrarazten du eta emozioa sorrarazten duena ederra dela esaten da. Zer da orekariak alanbre gainean eragiten duen isiltasun eta zirrara hori? Zailtasunak eta arriskuak eragina. Eta esaten da: *Ederra izan da.*

Gauza berak, hogei metroko goieran egin beharrean, lurretik metro erdira eginik, osagarri objektibo berdinak dauzka zailtasunean. Baina gustatzeko eragile handi bat galdu: arriskua. Ez dauka emoziorik. Haizkora jokoan, biren arteko desafio batetan adibidez, haseran eta azkenean arau berdintsuak daude. Haizkolarien teknika berdin berdina izan daiteke haseran, erdian nahiz azkenean. Areago oraindik, erdi aldean bizkorrago eta dotoreago ariko da. Estetikari begiraturik, irudi hobea emango du. Baina non biltzen da emozioa? Non dago edertasuna? Azkenean duda gabe, batez ere elkarren paretsu badoaz.

Beraz, edertasunaren barruan, barne osagarri objektiboez gainera, badira zailtasuna, arriskua eta emozioa, atsegina gehitzen dutenak. Bertsolaritzak hiru eragileak ditu. Zailtasuna, doinu, neurri eta errimak emana. Bertsozaleak zailtasun hori sentitu egiten du, jakin baino gehiago. Jakin ere bai, gutxi-asko noizbait bera ere saiatu delako. Eta saiatu ez bada ere, harigarri iruditzen zaio. Sentsazio hori, ohartuki ez bada ere, bere baitan sentitzen ari da, entzuten ari den bitartean.

Arriskua ere bai. Bertso bat hasi eta bukatzea alanbre gainean joatea bezalatsu da. Erdian eror liteke, edo toton egin. Gehienean bertsolari trebe samarrik ez da erdian geratzen, baina, amaitu arren, bidean erortzeko era asko dago. Bazterrera nola-hala iritsi bai, baina lumak bidean galdurik. Bertsozaleak hori ere sentitzen du. Neure gaztetako esperientzi bat kontatuz, lehenengoz bertso txapelketa bat entzun nuenean, nire bildur nagusia zen ea bertsoa amaituko ote zuten. Etengabe sentitzen nuen bide erdian noiznahi geratuko zirela. Orekariari goierak damaion arriskua bertsolariari jendeak ematen dio. Bertso batetik erortzea, bakarrean edo lagunartean denean, ez da hain mingarri. Bai, ordea, jende aurrean erortzea, batez ere txapelketa baldin bada.

Eta emozioa. Emozioa beste eragile askok emana datorren sentimendua da. Bertsolaritza joko denean, txapelketan adibidez, bada emozio orokor bat, une batzutan gehiago biltzen dena. Beste jokoetan bezala, azkenerantz beti gehiago. Jokotik aparte ere, bertsolaritzan badira uneak, emozioa bat-batean berotzen dutenak. Berotasun horri jareginez gero, bidertu egiten da.

Orain arte esana laburtuz, hiru osagai formal daude: doinua, neurria eta errima. Egitura nagusia hauena da. Hauetatik dator arriskua jende aurrean eta emozioa ere sortzen. Guztien artean edertasun bat egiten dute, batzuri gustatzekoa, beste batzuri ez. Baina edertasuna. Eta guzti hau bertsolaritzaren formari edo azalari begira.

**MAMIA:** Eta mamia? Barrua edo edukia? Kantatuz, neurtuz eta errimatuz, oso gauza ezberdinak esan daitezke. Gauza handiak eta txikiak, politak eta itsusiak, arruntak eta bitxiak. Hemen badira bi alderdi: esangaia eta esamoldea. Bion artean egiten dute edukia deritzona. Edukiaz edo mamiaz ez dago hain sistemakuntza zehatzik egiterik. Doinua, neurria eta errima nahiko zehatzak eta ia matematikoak diren bezala, mamia ez dago hainbeste zehazterik. Bai, ordea, barruti edo hesparru bat izendatu, muga doiak zeintzu diren bururik hautsi gabe.

Bertsolaritzaren barrutia ahozko literatura da. Honetaz hitzeginak gara *Bertsolaritza, mota herritarra* atalean. Han esana laburtuz, esangaiek hizkuntza mintzatutik bizi direnek ulertzeko modukoak izan behar dute. Barruti horretan, hizkuntza idatzitik bizi direnei ere gustatzeko moduko gauzak esan daitezke. Gainera oraindik, gehien irakurtzen edo espezialtzen direnak ere, hizkuntza mintzatutik asko gehiago bizi dira. Barruti zabala da, beraz.

Esamoldeak ere hizkuntza mintzatuaren barrutikoak izan behar du. Lexikoa edo hitzek hizkuntza mintzatuan ezagutzen direnak izan behar dute. Horrek ez du den-denak ezagun izan behar dutenik esan nahi. Bestela ez dago eboluziorik. Hitzez gainera, esaerak, konparazioak, joskera eta abar daude. Horietan guztietan ere, barruti horren barruan ibili behar da gehienbat. Entzunda ulertzekoa, ez hainbat aldiz irakurri eta zer esan nahi ote duen antzematen hastekoa. Dena dela, une bateraino, barruti honen mugak zauliak dira. Hizkuntza mintzatua bera ere zaulia den bezala. Hala ez balitz, beti toki berean geundeke, ez aurrera ez atzera. Zorionez ez da horrela. Gure kasuon, kontraesan handiak ere baditugu. Alde batetik hizkuntza mintzatua zabalduz eta era batera mehartuz doa. Hizkuntza bera literaturan eta hiztegietan ugaritu eta hiztunengan urritu. Baina hauek beste kontu batzu dira.

**BAT BATEKOTASUNA:** Azkenik, bertsolaritza gustatzeko, badago beste elementu oso berezi bat, bertsolaritzaren originaltasun nagusia ematen duena eta beste arte askok ez daukana: bat-batekotasuna. Era batera sortu eta interpretatu. Beste era batera esanez, gertatuala kantatu. Ez gertatua kantatu, gertatzen ari dena baizik. Kantatzen da edo kanta liteke behintzat. Orduan entzuleak ere bertan sarturik daude. Berak ere bertsoen gai dira.

Demagun berrogei bat laguneko afalondoan gaudela. Bertsolariek, neurri batez, han ikusten dituzten gauzak eta pertsonaiak kantatzen dituzte. Izen batzu aipatuko dituzte, bai ohoratzeko, bai zirikatzeko. Sarritan gauza handirik esan gabe, aipatzea eta zerbait esatea ere aski izaten da. Bertako entzuleek kanpoko bertsolariak baino askoz hobeki dazkiten gauzak eta ezagutzen dituzten pertsonaiak. Baina hantxe daude denak eta bertso gaien protagonista bihurtzen dira. Berak dira bertsogai eta gainera gertatzen ari den une berean.

Demagun plazan gaudela. Aurretik beste ikuskizun batzu izan dira. Jendea hura ikusi berri da eta, segun zer ikuskizun, hunkiturik edo barreka edo asperturik dago. Bertsolariak igoten dira eta bat-batean huraxe kantatzen dute. Gerta berri dena eta gertatzen ari dena. Asto laster bat izan bada, adibidez, astoak oraindik han daude, astodunak han daude, giro guztia han dago. Bertsolaria kantatzen ari dela beharbada, astoren batek arrantza egiten du eta bertsolariak berehala hartaz kantatzen du. Hori da bertsolaritzaren arrakasta nagusia dakarrena, momentuko ezustea, momentuko berritasuna, momentuak berak emana. Horixe da inprobisazioaren funtsa. Horrek ez du esan nahi beti eta denak horrela izan behar duenik. Baina horretatik proportzio handi samar bat ez badauka, bertsolaritza artifizialtzen ari da.

**ENTZULEA BARRU:** Gizateria nahiko espezie tentela da. Gizakiok nahiko inozoak eta sinpleak gara. Geure izena aipatzea, geu zerbaitetan sarturik egotea nahikoa da, hura on eta atsegin izateko. Nahiko ergelak gara, bai. Ergeltasun hori harroa, irenslea eta zapaltzailea izan liteke, dena neu eta beti neu eta neuk esana nagusi. Ez gara ergelkeri hortaz ari. Hemen beste tenteltasun sano horretaz ari gara. Haurtasuna, nahi baduzu. Haurrei eurak haintzat hartzea, eurak aipatzea, eurak protagonista bihurtzea gustatzen zaie. Haurrei gertatzen zaiena da ez dakitela disimulatzen. Nagusiei ere hori berdintsu gustatzen zaie. Gehiago segurrenik. Baina agian zerbait disimulatzen ikasi dute. Alderdi hori momentuan bertan bertsolaritzak bakarrik jo dezake. Hizlariak ere bai. Baina hizlariak egiten duena bertsolariak kantatuz, neurtuz eta errimatuz egiten du. Arte bihurtzen du. Gizakumeoi geure burua besteen ispiluan islaturik ikustea gustatzen zaigun bitartean, bertsolaritzak eragingailu handia duke hor. *Besteen ispiluan islaturik*, hots, entzuleengan. Gizon bati gauza xelebre bat berari bakarrik kantatzeak bere grazia eduki dezake. Baina batez ere besteen aurrean esateak dauka saltsa eta emozioa. Horrela besteak ere protagonista handi dira. Ez da, beraz, entzule guztiak izen eta guzti sarturik agertzea. Gehienak ez dira horrela azalduko, baina kantatzen dena entzuten eta bizitzen ari dira. Bataren edo bestearen erreakzioak ikusten ari dira. Hitz batez, saltsakide eta saltsagin dira.

**BERTSOAREN EGITURA:** Diogun azkenik bertsozaleak bertsoaren egituraz gozatzera eta gustatzera heldu behar duela. Bertsozale tradizionalek ez daukate heldu beharrik, hortik hasten baitira. Horrek esan nahi du kantua, neurria eta errima bere txukuntasunean eramatea beste gabe atsegin zaiola

bertsozaleari. Honekin batera, gehienean unea bera ere hantxe dago, alegia, gertatuala kantatzea. Esaten denak garrantzi handia dauka, baina dakiena kantaturik ere, bertsozalea gozatzen ari da. Berak dakiena esaten baitzaio, baina kantatuz, neurtuz eta errimatuz. Egitura honen balio estetikoa biziki sentitzen ez duena nekez izango da bertsozale handi.

Beste arteetan ere, azalari ala edukiari garrantzi gehiago eman, gorabehera eta eztabaidak izaten dira. Batzuk edukiari eta beste batzuk formari berari begiratzen diote gehiago. Biak batera ez da txarrena. Hemen nabarmendu nahi dugu bertsolaritzan ideiei eta edukiari gehiegi begiratzeko arriskua dagoela. Bertsoen formari edo egiturari bere garrantzi funtsezkoa eman behar zaio. Ideiak eta nahi duzuna, baina bertsoz eta hizkuntza onez.

Honenbestez nahiko frogaturik dagoela uste dut bertsolaritzak elementu gustagarri edo estetikoak badituela. Beste kontu bat da nori edo zenbat atsegin zaion. Ehuneko batzuri gustatzea nahikoa da, arte herritarra eta masiboa izateko.

## EUSKARAREN GAITASUNAK BERTSOGINTZARAKO

Euskararen mitifikatze alperrekoz, inoiz uste izan da bertsotan egiterik ez dagoela, euskaraz izan ezik. Gaur ez ahal da horrelakorik uste duenik izango. Beste toki batean, inprobisazioa eta bertsogintza jardun unibertsala dela agertua dugu. Hala ere, hizkuntzen bikaintasunen mitifikatze tentelik egin gabe ere, hizkuntza batetik bestera alde handiak daude. Hizkuntzen ezberdintasuna nabaria da. Ezberdintasun hau batez ere egituretan axola zaigu, ez lexikoan. Horretan euskarak baditu alde on batzu, inguruko hizkuntzekin konparaturik. Gaztelaniarekin konparatuko dut, horixe ezagutzen baitut ondoen eta horrekin baitauka euskarak inguramenik gehien. Bost berezitasun nagusi aipatuko ditut euskararen alde, bertsogintzarako:

**1) DEKLINABIDEA:** Euskal deklinabidea eranskorra da, hitzari atzetik eransten zaiona. Har dezagun **gazte** hitza eta, mugatu eta mugagabe, deklinabidea honela doa: *Gazte-gaztek, gaztea-gazteak-gazteek, gazteren-gaztearen-gazteen, gazteri-gazteari-gazteei, gazte-gaztea-gazteak, gaztez-gazteaz-gazteez-gazteetaz, gaztera-gaztetara-gazteetara, gazterekin-gaztearekin-gazteekin* eta honela beste atzizki guztiekin: GAZ, N,TAN, ETAN, TZAT, TZAKO, GATIK, GAN, GANA, GANAINO, RAINO, KIKO, RIK, TARIK eta abar.

Badira aditzaren atzizkiak ere, euskaraz denak atzetik doazenak: *egiten, egiteko, egitean, egitearren, egitetik, egiteagatik, egiterako, egitekotan, eginez, eginik* eta abar. Aditz jokatuan ere berdin: *Duena, duenak, duenaren, duenari* eta deklinabide guztia. Eta gainera aditzaren atzizki bereziak: *Duelako, duenean, dueneko, duenerako, duela, duelarik, duenez, duenik* eta abar.

Egitura honek errimarako bide handiak zabaltzen ditu eta bertsogintzan errima da, neurriarekin batera, elementurik garrantzitsuena. Gaztelaniaz ez

dago hori egiterik. Ez dago *voy calle a la* esaterik, *voy a la calle* edo *a la calle voy* baizik. Gaztelaniaz deklinabideko preposizioak eta beste guztiak, hizkuntzaren egituran hain garrantzi handia daukatenak, ez dago inoiz azkenean jartzerik. Hona hemen mordo bat: *el, la, los, las, de, del, a, al, con, para, sin, por, aunque, cuando, como, contra, en, sobre, mientras, que, donde, entre* eta abar. Hauetan badaude batzu, preposizioz gainera, adberbioak ere direnak: *dónde, cómo, cuándo, qué, mientras* eta abar. Gehienak azentuz bereizten dira. Ez da berdin *cuándo viene?* eta *cuando viene*. Euskaraz *noiz dator* eta *datorrenean*. Gaztelaniaz ez dago horiek denak inoiz atzetik jartzerik, hizjoko bereziren batez izan ezik. Beraz, delinabidez eta preposizioz ez dago errimarako lagunik.

Norbaitek esan lezake: *Euskaraz ere ez dago horiek aurretik jartzerik*. Arrazoia. Baina hain zuzen errima azken hitzean izaten da eta hor dago gako nagusietariko bat. Gaztelaniaren aurretik jartzeak beste zerbaiterako abantaila ukan dezake, baina ez kasu honetan. Gaztelaniazko *preposizioak* euskaraz *posposizioak* dira.

**2) ESALDIAREN ORDENA:** Hemen ez dago hain alde edo ezberdintasun zehatzik, baina bai oso handia. Euskaraz esaldiaren egiturak hitzak atzekoz aurrera nahiz aurrekoz atzera ordenatzeko modua ematen du. Adibide bat: *Bihar etorriko nintzela esan nuen nik atzo*. Esaldi honetako zazpi hitzak, bakoitza azken dela ordenaturik, euskaraz apenas esaldirik bortxatzen den:

Bihar etorriko nintzela esan nuen atzo **nik**.
Atzo nik bihar etorriko nintzela esan **nuen**.
Bihar etorriko nintzela nuen nik atzo **esan**.
Atzo esan nuen nik bihar etorriko **nintzela**.
Atzo esan nuen nik bihar nintzela **etorriko**.
Atzo esan nuen nik etorriko nintzela **bihar**.

Esaldi guztiok badute alde izpi bat matizean, baina guztiak dira naturalak, kantatzeko behintzat. Dagigun aproba bera gaztelaniaz: *Yo dije ayer que vendría mañana*.

Gaztelaniaz *dije* eta *vendría* hitz bakarrak dira eta euskaraz bikoitzak: *esan nuen* eta *etorriko nintzen*. Paretasun gehiago edukitzeko, jar dezagun gaztelaniaz ere aditz laguntzailez eginik: *había dicho* eta *habría de venir*. Gaztelaniaz hauek ez dira zuzenegiak, baina konparazioa egiteko hobeki datoz. Hasteko, hemen badira bi hitz, inola ere azkenerako aparta ez daitezkeenak: *que, de*. Beste bi ere nekez: *había, habría*. Gainerakoekin honela lihoazke esaldiak:

Había dicho yo ayer que mañana habría de **venir**.
Que habría de venir mañana había dicho yo **ayer**.
Que habría de venir mañana había dicho ayer **yo**.
Que habría de venir mañana había ayer yo **dicho**.

Euskarazko esaldietatik hauetara badago alderik naturaltasunean. Ez dut esaldi anormal samar hori tranpaz jarri. Har dezagun lehenengoa, nahi baduzu:

Yo dije ayer que vendría mañana.

Hemen ere badago hitz bat, azkenean ezin sartzekoa: *que*. Hona beste esaldiak:

Yo dije ayer que mañana **vendría**.
Que mañana vendría dije ayer **yo**.
Que mañana vendría dije yo **ayer**.
Que mañana vendría ayer yo **dije**.

Hiru azken esaldiok ez daude gaizki, baina artifizial samar ematen dute. Ez dira euskarazkoak bezain naturalak. Poesiarako, operarako eta abarrerako balio lezakete, baina hizkuntza mintzatuan pedantetxo geratzen dira. Bertsolaritza berriz hizkuntza mintzatuaren edo ahozko literaturaren barrutian dabil.

Esaldia era horretara ordenatu ahal izateak errimarako abantaila handia dauka, nahi den hitza azkenerako gordetzeko modua ematen baitu. Eta neurrirako ere bai. Bertso guztian zehar, hitzak eta esaldiak neurturik edo ritmoz eraman behar dira. Esaldiaren egitura ezberdin eta naturalki ordenatzeko modu errez horrek joko handia ematen du.

**3) ELIPSIA:** Elipsia esaldi batetan hitz bat edo bi edo gehiago jatea da, gainulerturik daudelako. Hori hizkuntza guztietan normal eta beharrezko da. Esaterako, norbaitek galdetzen badizu:

–Aita ikusi al duzu?
–Ez dut ikusi –erantzuten duzu. Ez duzu esaten:
–Aita ez dut ikusi.

Hitz hori bigarrenean jan egiten da, gainulerturik dagoelako. Horixe da elipsia. Bi eratakoa izan daiteke, bata jarri duguna, alegia, hitz bat esan berri delarik, hurrengo esaldian ez dugu hura berriz errepikatzen. Beste era bat hitzik inguruan ere agertu gabe izan daiteke. Baina kontestutik aisa gainulertzen da. Galdera hau, adibidez:

–Zer moduz sakela? –Eta erantzun dezakezu:
–Hutsik.

Hemen hiru osagai jaten dira: *dago, sakela, diruz*. Galderan bertan ere *dago, diruz* janak zetozen. Erantzunean *sakela* ere jaten da. *Dago* edo antzeko aditzen bat *–daukazu, duzu, darabilzu…–* jatea esaten ari garen bigarren kasua da. Aditz hori galderan ere jana zegoen. Ez da, beraz, testuan ageri. Hala ere

ondo ulertzen da zer falta zen. Eta zer esan *diruz* horretaz? Zer moduz sakela galdetzean, gehienean dirua edo horrelako zerbait izango da. *Sakelak husturik* esatean, besterik izendatu ezik, inork ez du *harriak* edo *kilkirak* ulertuko, gehienean *diruari* buruz izaten baita. Sagar lapurretan dabiltzan mutikoen ahoan baliteke sagarrak izatea, kontestuak horixe ematen baitu.

Badira hitzak, beraz, ager berri direlako jaten direnak, ez errepikatzeagatik, eta beste batzu, agertu gabe ere jaten direnak, zer falta den aisa ulertzen delako. Kasu honetan euskaraz aditza jatea bereziki ugaria da. Euskaraz galderarik normalenak dira honelakoak:

–Zer moduz etxekoak?... Zer berri herritik?...

Hauetan aditz guztiak janda daude. Gaztelaniaz:

–Qué tal están los familiares?... Qué noticias hay por el pueblo?...

Gaztelaniaz aditza sarritan jaten dutenak euskarazko egiturekin hizketan ari dira. Euskaraz aditza ezabatzea askoz naturalago da gaztelaniaz baino. Gai honi NEURRIA sailean atal berezi bat emango diogu eta hura ikus. Han azalduko dugu zer baliabide garrantzitsua den elipsia neurrirako. Bertsogintzako elementu nagusietarikoa neurria izanik, euskarak badauka abantaila bat honetan, gaztelaniaz konparaturik behintzat. Hona hemen adibide bat bertso erdi batekin:

Hontza zamaltzain, ahuntza zamari
aker aitona putzari adi
kukuak soinu, muskerrak dantza
ni haritz puntan kantari.

Hemen ez dago batere aditzik eta esaldi naturala gertatzen da.

**4) AZENTUA:** Hona hemen beste gako handi bat gaztelaniaz, euskaraz inolako eragozpenik ez daukana. Euskaraz ez da azentu ortografikorik erabiltzen. Horrek ez du esan nahi azenturik ez dagoela. Ez dago hitzik ez hizkuntzarik, azentu gabekorik. Euskaraz nahikoa da herri batetik bestera pasatzea, sarritan etxe batetik bestera, azentu ezberdinaz ohartzeko. Zer esanik ere ez, euskalkitik euskalkira bagoaz. Euskaraz azentua badago eta oso nabaria gainera. Gertatzen dena kanturako ez duela trabarik jartzen. Kantatzean, azenturik ez balitz bezala gertatzen da. Zergatik? Hori beste kontu bat da. Orain aski zaigu, bertsotarako behintzat, hala dela jakitea.

Gaztelaniaz, ordea, ez da horrela. Hizkuntza horretan, azentua kantuarekin batera ondo eraman ezik, belarriak ederki mintzen dira. Horregatik, gaztelaniaz nahiko zaila da letra egokiak egitea eta horregatik sarritan zabarkeriak entzun behar izaten dira zenbait kantarirengan. Musikak edo doinuak bere azentua edo bere gora-beherakoa darama. Nota batzu gorago, beste batzu beherago. Gaztelaniaz, testuaren azentua musikaren azentuarekin bate-

ra eraman behar da. Har dezagun adibide bat. Bilintxen *Loriak udan* bertso doinuan, hona lehen puntua:

Loriak udan intza bezela
maite det dama gazte bat.

Hona letra posible bat gaztelaniaz doinu honekin kantatzeko:

En este canto que voy cantando
cuento la muerte de un león.

Kasu honetan letraren azentua musikarekin batera doa. Hona, ordea, beste testu bat orain:

En esta canción que voy a cantar
cuento la verdad del tigre.

Letra hau euskal arauan ondo neurturik dago, baina azentuaren desintonia belarria zulatzerainokoa da. Dena den, gaztelaniaz bertso lerroaren azken hitzak, –errimatzen duen oina gehienean– azentu akutua daramanean, hots, azentua azken silaban daramanean, honek bi silaba bezala balio du eta beraz silaba bat gutxiagoz neurtu behar da lerroa. Alde horretatik, adibideok gaztel arauan ez dira zuzenak izango, baina euskararekin konparatzeko balio dute. Gure hizkuntzan ez dago azentuaren ardurarik. Hala balitz, lan zailagoa genuke. Azentua zaindu beharrak bertsolaritza, daukagun bezalakoa behintzat, agian ezinezko bihurtuko luke. Gainera kontuan eduki behar da doinu bakoitzak bere azentu musikala daramala. Beraz, goragoko doinuan ontzat emaniko hitzak beste doinu batean gaizki letozke. Doinu bakoitzari bere azentuera egokitu beharrak Babelgo dorrea baino nahaste handiagoa eragin lezake. Edo ez agian, baina zorionez euskaraz ez daukagu hori pentsatzen hasi beharrik ere.

**5) ADITZA:** Euskaraz nornahik dakiena da aditza oihan amaigabea dela. Horrek baditu bere oinazeak ikasi behar duenarentzat, baita dakigunontzat ere sarritan. Baina bertsogintzarako, aditzaren ugaritasun mugagabeak erreztasun handia ematen du, errimarako batez ere. Aditza esaldiaren bizkarhezurra da. Aditza da garrantzitsuena eta beharrezkoena. Hiztegi errimatuan aditzaren barruan lau subsail sartzen ditugu: 1) Aditz jokatua (laguntzailea eta sintetikoa). 2) Aditzak. 3) Aditz biokoitzak. 4) Era intenporala.

Adibide bat jartzeko, gaztelaniaz aditz guztien amai posibleak hiru dira: AR, ER edo Ir. *Andar, comer, vivir.* Aditzen izendapenean beste amairik ez dago. Euskaraz, ordea, ia errima guztietan dago aditzen bat, eta batzutan asko: *atera, ezari, eseri, agiri, erori, jalgi, iraungi, jarki, eho, idoro, pasa, ase, hasi, josi, eutsi, utzi, egon, itxaron, bete, erre, ebaki, jaiki, ekarri, igorri, etzan, entzun, irakin, estali, ibili* eta abar. Eta gero DU-TU amaidunak: *galdu, zuzendu, agindu, umildu…hartu, eskatu, puztu, argitu* eta abar.

Hemen garrantzia daukana ez da oin batetik asko edukitzea, askotarik edukitzea baizik, gutxi bada ere. Gaztelaniaz hiru errima posible bakarrik dauden lekuan, euskaraz begira zenbat diren. Aditz jokatua sartu gero berriz, askoz alde nabarmenagoa dago. Pentsa euskal aditz jokoak zenbat era ezberdin dituen. Gaztelaniaz har dezagun aditz laguntzaile bat: *He traído, has traído, ha traído, hemos traído, habeis traído, han traído*. *He traído* hori beti da **he**, plurala nahiz singularra, edo bati nahiz besteari izan. Euskaraz ordea: *dut, ditut, diot-dizkiot, dizut-dizkizut, diet-dizkiet*. Joko hori hitanoan eginez gero, beste hainbeste hika, beste hainbeste noka. Euskal aditzaren ugaritasun honek errimarako gaitasun handia ematen du, beste gauza batzutarako buruhauste galanta bada ere.

Esaniko bost puntuetan garrantzitsuenak, nire ustez, deklinabidea, esaldiaren ordea, eta azentua dira. Elipsia eta aditza, oso garrantzitsutak izanik, ez dut uste beste hiru nagusi horien mailara heltzen direnik. Munduan izango dira beste hizkuntza batzu, antzeko abantailak edo handiagoak dituztenak. Gaztelaniak ere beste sail batzutan badu abantailarik euskararekiko. Baina bertsogintzarako honek alde handia kentzen dio aipatu berezitasunetan.

## EUSKARAREN DESABANTAILAK BERTSOGINTZARAKO

Aurreko atalaren baikortasunak gehiegi harrotu bagaitu, orain deskontua dator eta gogor samarra gainera. Aipatu abantailekin batera, ba al daukagu desabantailik gaztelaniaren eta beste inguruko hizkuntzen ondoan? Hiru aipatuko ditut, bi errimari eta hirugarrena neurriari dagozkionak.

**1) ARTIKULUA:** Berez lehen puntu hau ere deklinabidean sartzekoa zen, artikulu mugatudunak *–ateA, zabalA, biziA...–* nahiz mugagabedunak *–ate BAT, zabal BAT, bizi BAT...–* deklinabideko kasu jakin batzu baitira. Aparte hartu baditugu, multzo honek deklinabidearen zatirik behinena osatzen duelako da. Arestian euskal deklinabide erantsia abantailatzat jo badugu, orain berak dakarkigu desabantaila ere. Euskaraz artikulua, mugatua nahiz mugagabea, hitzaren atzetik doa beti. Hori da euskararen ezaugarrietako bat. Horrek esan nahi du hitz hori errimatzat gordetzerik ez dagoela, gehienean atzetik artikulua baitarama. Hitz bat, hiztegian irakurtzen den bezala, errima edo oin izateko era bakarra mugagabean uztea da. Har dezagun adibidetzat *hitz* bera. Honek deklinabidearen forma posible guztiak har ditzake: *hitz, hitza, hitzaren, hitzari, hitzera, hitzeko, hitzarekin... hitzak, hitzek, hitzen, hitzei, hitzetara, hitzetako, hitzekin* eta abar. Kasu berak mugagabean.

Horiek denek errimarako ahalbide handia ematen dute, aurreko atalean ikusi bezala, baina noiz utz dezakegu hitza bere forma mugagabean? Alegia, noiz utz ditzakegu hitzak honela: *hitz, haitz, txapel, lan, herri, zigor, babes* eta abar? Oso kasu gutxitan. Mugagabean bakarrik. Horrek esan nahi du aurretik

mugagabea eskatzen duen zerbait eraman behar duela, hots, zenbatzaile zehaztugaberen bat: *bi, hiru, lau, dozenerdi, dozena bat*... Zenbaki guztiak eta *zenbat, zenbait, hainbat, anitz, asko, nahiko, aski, aina-adina, beste, hainbeste bezanbat, edozenbat* bezalako kantitatezkoak. Berdin kantitatea eta neurria adierazten dutenak ere: *eskukada bat ale, etxe bete gizon, botila bat ardo, kilo bat kafe, litro bat ur, imina bat gari* eta abar.

Hitza aditz bikoitz baten zati izan daiteke eta orduan mugagabean behar du: *negar egin, piz egin, indar egin, irri egin*... *erruki izan, gorroto ukan, bat etorri*... Errimarako komeni denean, ordena alda daiteke: *egin negar, egin piz, dut gorroto, gara erruki* eta abar.

Adjetiboek –zenbait izenek ere bai– adberbio lana egin dezakete eta orduan mugagabean behar dute: *argi egon, gizon jokatu, triste bizi, zuzen ibili, gogor jo, zabal hartu, motz gelditu*... Hemen ere, errimarako komeni denean, ordena alda daiteke. Edo aditz baten atributo gisa: *irakasle egon, alkate izendatu, gizon bihurtu, handi egin, mamu iruditu*... *Izan* aditzak ere onartzen du era hau, normalena ez bada ere: *eder da, gazte naiz, harrigarri da* eta abar.

Badira esamoldeak, hitza bera errepikatuz edo beste hitz batekin bikote eginez, mugagabean uztekoak: *hitz eta hitz, indar eta indar, hitz eta bits*... *etxe eta herri, mendi eta baso, ardo eta ogi*... *kalez kale, begiz begi, buruz buru*... *egi edo gezur, uso ala otso, okela nahiz haragi* eta abar. Beste zenbait kasu ere izango da. Helburua ez da mugagabearen azalpen exhaustiboa ematea, hitz bat noiz horrela utz daitekeen adibide batzu ematea baizik. Garrantzitsuenak hauek dira eta asko gehiago aurkitzeko itxaropenik ez izan.

Eman ditugun kasuak asko ala gutxi al dira? Honela hutsean begiraturik, baliabide ugaria ematen dute, baina hizkuntzaren orotasunean, kasu bakanak, ia salbuespenak dira. Ehuneko bost bat izatea bezala. Gehienean, edo artikulua darama –*hitza, haitza, hezea, alorra*– edo beste deklin-atzizkiren bat: *etxera, bakoitzean, herritik, mendiko, zigorrari* eta abar. Honek esan nahi du oso gutxitan utz dezakegula hitza bere forma mugagabean. Beste era batera esanda, hiztegi errimatuan datozen hitz horiek guztiak ia inoiz ezin dira era horretan aplikatu, hitza bera A bokalez amaitzen ez bada: *ama, fama, minbera, tankera, bizitza, saltsa, atorra, urlia, mafia* eta abar. Hauetan azken bokalak eta artikulu mugatzaileak bat egiten dute, nahizta euskalkietan –bizkaiera osoan adibidez– badiren *famea-famia-famie, bizitzea-bizitzia-bizitzie* eta abar bezalako formak.

Beste guztiek artikuluaren mende daude, nahizta subjektu edo konplementu izan. Artikulu hau gehienbat mugatzailea izan ohi da. Har dezagun, adibidez, L hizkiz amaitutako atala: *atal, azal, tamal, magal*... *hegal, ezpal, metal, ideal*... *itzal, oihal, printzipal*... *uhal, hutsal, mural*...; *arbel, txartel, sabel, fardel*... *epel, ezpel, berdel*... *igel, pintzel, marinel*... *nobel, koktel, koronel*... *ustel, upel, eskudel*...; *zakil, urtarril, ukabil*... *istil, bipil, gingil*... *opil, bonbil, borobil*... *umil, gurpil, fusil*...; *sail, otsail, mirail, erdoil, suil*...; *odol, oskol, futbol*...; *eztul, mardul, margul*...

Hitz hauek guztiak era honetan ia inoiz ezin ditugu ointzat erabili. Horrek esan nahi du A bokalez amaitzen ez diren hitz guztiak –gehienak

beraz– errimarako, euren forma biluzian, alperrik dauzkagula. Zertarako dugu errima batean ehundaka hitz edo ahalbide ezberdin edukitzea, gero horrela erabiltzerik ez badago? Hitzak esatean, zehaz dezadan izenak, adjetiboak eta izenordainak direla. Aditza adjetibo gisa deklina daiteke forma partizipioan: *egina, esana, ekarria, erosiak, hartuak*... edo izan gisa aditz-izenetan: *ikustea, ikustearen, ikustera, ikustearekin, ikustetik*... Bestela ez dauka deklinabidearekin zerikusirik. Izenordainak deklinagarri dira, baina denak batera ere oso gutxi. Azkenik, adberbioak ez dira deklinatzen.

**2) DEKLINABIDEA:** Gorago euskal deklinabidearen abantailak baloratu ditugu, deklin-atzizkiak, atzetik joatean, errimagai direlako. Gaztelaniaz ez dago *de, con, para, a* eta abarrekin errimatzerik, preposizioak dira-ta. Euskaraz bai. Baina honek bere alderantzia dakar, hots, euskal deklinabideak ez diola uzten hitzari azken jartzen, toki hori atzizkiari baitagokio. Honela, euskarazko KIN atzizkiak nahitaez honelako hitzak sortuko ditu beti: *zurekin, aitarekin, harriarekin, makinarekin, egiarekin*... Berdin pluralean eta mugagabean. Denetan egitura bakarra, KIN, geratzen zaigu errimarako. Gaztelaniaz CON hartzen badugu, preposizio honi edozein errima erants dakioke: *contigo, con fuerza, con los pies, con la mente, con rigor, con decir, con Dios, con el tiempo, con tus problemas* eta abar. Berdin beste preposizio guztietan. Euskaraz preposizio horiek atzizkiaz beste ahalbiderik ez daukate: *noRI, noREN, norenTZAT, noreKIN, noreGAN, noRA, nonDIK*... Argi dago preposizioak posposizioak baino errimabide gehiago ematen duela, alde nabarmenki handiz gainera.

Hauek honela, hitzik gehienak, hiztegirik gehiena, praktikan alperreko gertatzen zaigu, artikuluak eta deklinabideak ez baitigute uzten darabiltzagun hitzak azkenerako gordetzen. Hau desabantail ikaragarria da. Balantzan jarririk, beronek bakarrik deskonpentsa ditzake aurreko atalean azalduriko abantaila guztiak. Hizkuntzak diren bezalakoak dira eta euskal deklinabideak, zenbait abantailaz batera, bere muga zorrotz hauek ezartzen dizkio errimari.

**3) ADITZ PERIFRASTIKOA:** Euskaraz bi adizjoko daude: sintetikoa eta perifrastikoa. Sintetikoak edo euren jokoa zuzenean daukatenak oso gutxi dira: *egon, joan, ibili, ekarri, eraman* eta abar. Hauek zenbait denboratan euren jokoa daukate: *nago, doa, gabiltza, dakarte, narama* eta abar. Beste guztiak perifrastikoak edo aditz laguntzailea behar dutenak dira: *pentsatzen dut, jango dute, irabazi genuen, kanta dezagun, loratzen dira, eroriko ginateke* eta abar. Gure inguruko hizkuntzek aditz guztiak sintetiko dauzkate: *pienso, comerán, ganamos, cantemos, florecen, caeríamos* eta abar. Denbora gutxi batzutan laguntzailea darabilte: *hemos comido, habría pensado, hubiera sido*... Baina hauek aditzaren eremu txikia hartzen dute. Denborarik erabilienak *–pienso, pensaré, pensaba, pensé, pensaría, piense, pensase, pensad–* sintetikoak dira.

Euskal aditzaren izaera honek bertsogintzarako bere alde ona eta txarra dauka. Betelana egiteko, zenbait puntu gauza handirik esan gabe jazteko eta

horrelako helburu praktiko batzutarako, gure aditzaren luzetasuna ondo dator. Bat-batean betelanak eta lan jantzigarriak asko egin behar dira.

Baina edukiz bete nahi diren zatietan –ideak, deskribapenak, ziriak, konparazioak, sentimenduak...– euskal aditzak espazio handiegia okupatzen du. Beste hizkuntzen aldean toki luzea behar du, nahi diren gauzak esateko aukera mugatuz. Balantzan jarrita, alde makur honen pisua askoz handiagoa da, luzetasunaren abantaila baino. Euskara saiatzen da oztopo horri bere gurpila hartzen, elipsiaren bitartez. Gure elipsiaren garapen handiaren arrazoi nagusia aditz perifrastikoaren luzetasuna ekiditea da, batez ere neurri txikietan eta elkarren gainean datozen puntuetan.

Hizkuntzek, komeni zaienean, luzatzeko mila baliapide daukate. Laburtzea da problema eta horretan euskal aditzak desabantaila handian uzten gaitu beste hizkuntzekiko. Eta honek oraingoz ez dauka erremediorik. Aditz sintetikorik ezak errimarako ere desabantaila handia dakar. Aditz forma jokatuak dauzkan oinak edo errima motak baliabide gehiago ematen du, aditza oso elementu sargarria baita. *Dago, daude, dakigu, dira, geunden, datoz, dabiltza...* eta antzekoak noiznahi erabil daitezke. Baina euskaraz aditz gutxi dira horrelakoak. Har dezagun adibidez *ARA, ERA, IRA, ORA, URA* blokea eta dagigun euskararen eta gaztelaniaren arteko konparantza. Euskaraz *gara-zara, gera-zera, gira-dira-balira* dauzkagu. ORA, URA sailetan ez dago ezer. Gaztelaniaz, ordea, bakoitzean hainbeste daude: *para-prepara-separa... viajara-bisitara-jugara; espera-entera-esmera-tolera...quiera-quisiera-supiera; tira-retira-expira-mira-admira...; colabora-mejora-ignora-demora...; satura-tritura-apura-asegura...*

Har dezagun orain ABA, EBA, IBA, OBA, UBA blokea eta euskaraz ez daukagu aditz forma jokaturik bat ere. Gastelaniaz, ordea, aurretik bokala daramaten BAR-BER-BIR edo VAR-VER-VIR amai guztiak: *traba-acaba... cava-socava-lava...; beba-deba-ceba... lleva-eleva-abreva...; reciba-escriba-estiba... viva-aviva-motiva...; roba-soba-joroba... trova-deshova...; suba-incuba-entuba...* Har dezagun NTA aurreko bokala aldatuz eta euskaraz bat ere ez daukagun bitartean, gaztelaniaz: *canta-decanta-aguanta... tienta-calienta-ostenta... pinta-encinta-entinta... monta-remonta-chonta... junta-apunta-barrunta...* Har dezagun NTE: *cante-levante-aguante... cuente-reviente-miente-detente... pinte-esprinte-entinte... ponte-monte-remonte... apunte-despunte-adjunte...*

Nahiko adibide izango da, beste errima mota guztietan ere berdin konpara daitekeela ikusteko. Euskal aditz sintetikoaren urritasunak ere ez dauka erremediorik, oraingoz behintzat.

## ARRANTZALE BERTSOLARIAK

Euskararen iraupenean arrantzale herriak nagusi izan dira. Gaur ere proportzioz euskarari gehien arrantzale artean eusten zaiola esan daiteke. Euskal Herriko zerrorik euskaldunena agian itsas ertza izango da: Armintza, Bermeo, Elantxobe, Lekeitio, Ondarroa, Mutriku, Deba, Zumaia, Getaria, Orio,

Donostia, Pasaia, Hondarribia, Hendaia, Ziburu, Donibane, Miarritze, Baiona. Herri hauetako arrantzaleak hain euskaldunak izanik, nola ez da bertsolari tradiziorik izan?

Esan beharra dago ez dela berdin bertsolaritza eta bertsozaletasuna. Itsas herriak oso bertsozaleak izan dira. Edo gutxienez, lehorreko herrien pare jarri behar dira horretan. Badira lehorrean ere aldeak. Herri batzutan gehiago, beste batzutan gutxiago. Itsas ertzean bezala. Adibide bat jartzeko, Ondarroan ainako bertsozaletasunik ez da lehorreko herrietan ere nonahi izan. Beraz, diren gorabehera guztiekin, horretan itsasoa eta lehorra berdinean utzirik, ez dugu aberi handirik egingo.

Bertsozalez gainera, arrantzale herriak oso kantariak izan dira. Kantari onak gainera. Eta bertsoei buruz, bertso jarrien kantari biziak. Zergatik ez da bertsolaririk sortu? Zergatik ez dira arrantzaleak beretsolaritzan nabarmendu? Bertsolaritzaren izaera eta arrantzaleen biziera alderantziz daudelako. Beste nonbait esana dugu bertsolaritzak baldintza batzu behar dituela. Dibertsio gisa bertsolaritza garatzeko, lau baldintza jartzen genituen: herri osoa (edo herri zati bat), toki berean geldi, denbora luzea, eta dibertitzeko gogoa. Arrantzale bizitzan bi aldi berezi behar dira: itsasoan dabiltzana eta lehorrean daudena. Lehorrean daudenean, herria biltzea, toki berean geldi egotea eta dibertitzeko gogoa ondo betetzen dira.

Denbora luzeari buruz, ordea, eguneko denbora eta denboraren jarraipena berezi beharra dago. Arrantzaleak lehorrean elkarrekin ordu luzeak egiten dituzte, esaniko baldintza guztiekin. Baina denbora horrek ez du jarraipenik urtean zehar. Itsasoratzean, denbora etenik geratzen da. Lehorreko denbora oso denbora konprimatua da. Berriz ur gainera itzuli beharrak denbora hura xurgatzera daramatza. Bertsolaritzak patxada edo baretasun gehiago eskatzen du. Baina hori gutxiena da. Gehiena bestea da, alegia, arrantzaleen lehorreko bizierak ez duela egonkortasunik.

Bertsolaritza bezalako jenero batek estabilitate luze hori behar du, bere ritmoa behar du, ritmo etengabea. Nukleoen edo lagunarteen ritmoa, ez pertsona bakoitzarena. Herri bateko sagardotegian edo tabernan giro edo nukleo hori segurturik zegoen, bat edo beste tarteka falta izan arren. Arrantzaleen artean, ordea, itsasora doazenean, dena eten da, bai pertsonen eta bai taldeen ritmoa.

Eta itsasoan? Badirudi itsasoan herri zati bat biltzea, toki berean eta denbora luzean elkarrekin egotea inon baino hobeto betetzen dela. Beharbada dibertitzeko gogoa falta. Baina hau izango da tarteka. Orduan zer? Lehenbizi, herria edo herri zati bat biltze horrek (hamabost laguneko tripulazioa adibidez) badu bere gakoa. Hamabost lagun dira, baina beti berak eta derrigor elkarrekin, beste lagun ezberdinen inolako sar-irtenik gabe. Hori ez da herria batzea, derrigor baturik egotea baizik. Hor ez dago herria batzeak esan nahi duen barietaterik ez berezkotasunik.

Herri batean ere baliteke gehienean lagun berak batzea. Gutxi gora behera beti talde behera. Baina orduan batzeko gogoa dutenen kointzidentzia da, ez derrigorra. Arrantzaleek ere ederki egiten dute hori, lehorrean daudenean.

Toki berean eta denbora luzean elkarrekin egotea itsasoan inon baino gehiago betetzen da, baina gehiegi. Eta gehiegia gutxiegia bezain agorra da. Bertsolaritzak eskatzen duen dibertitzeko gogoa edo aldartea edukitzea oso zaila da ur gainean, untzi barruan.

Hitz batez esateko, arrantzaleen itsasaldia lanari loturik dago. Eta nolako lana gainera. Lanean ez daudenean, atsedenean daude. Eta arrainik ez dagoelako geldi egon beharrik badute, hainbat okerrago. Bertsotan egiteko, egoera eskasa da hori. Bertsolaritza lanetik kanporako jarduna da. Lanean ari diren basa-gizonak, nahiz etxeginak, nahiz lantegi bateko langile hurbilak nekez hasiko zaizkizu bertsotan. Lanaren barrutia ez da inola ere bertsolaritza sortzekoa. Bertsolaritza dibertsioaren barrutian jarri behar da, gorago jarritako baldintzekin. Arrantzaleen itsasoko biziera lanaren inguruan dabil. Horrez gainera, beti lankide berak eta egun osoan eta hil osoetan elkarrekin egon beharra bertsolaritza lantzeko baldintza gaiztoa da, zaleak izanik ere.

Arrantzaleen bizieran, beraz, lehorrean eta itsasoan bikoitza eta oso ezberdina izanik, bertsolaritzari dagokion baldintzarik ez dago, ez batean ez bestean. Soldadutzan ere antzeko zerbait gertatzen da, batzu zerbait saiatzen dira baina. Bata ernegaturik dagoelako, bestea etxeaz gogoratzen delako, bestea bere pentsamentuetan ari delako, soldadutzan ere zaila da bertsolaritzak behar duen talde-giro iraunkorrik sortzea. Eta espetxean zer esanik ere ez. Inon egotekotan, hantxe daude toki bera eta denbora luzea elkarrekin. Baina espetxeko tokia eta denbora izorratuegiak dira, bertsolaritzaren iturri izateko.

## EMAKUME BERTSOLARIAK

Bertsolaritza gizonena izan da batez ere. Bertsolari gisa gizonena osoki, eta bertsozale edo entzule gisa ere gizonena gehienbat. Zergatik ez da historian emakume bertsolaririk izan? Zeren ez baita alerik ere izan, maila batera heldu denik behintzat. Historian aipatzen diren Milia Lasturkoa eta horrelako kasuak ez dakigu zehazki nolakoak ziren. Emakume haiek, esan bezala kantatzen bazuten ere, kantatzen zutena inprobisatua zela sinesteko motiborik ez dago. Are gehiago, gureganaino heldu diren Milia Lasturkoaren koplak eta bertsoak ez dira inola ere inprobisatuak. Garai haietan bertsolari gizonezkorik ere apenas izango zen, gaur daukan figura sozialez behintzat. Inprobisatzaileak izango ziren, koplariak eta abar, baina ez bertsolaririk segur asko.

Bertsolaritza sortu eta gero ere, emakume bertsolaririk ez da izan. Horren arrazoi nagusia gizartearen egituran jarri behar da. Bertsolaritza taberna eta sagardotegi giroko jarduna izan da. Eta gehienean gauekoa. Tokiz eta orduz, emakumeek sarbide gutxi zutenekoa noski. Bertsolari gizonezkorik

ere sarritan etxerako nahi ez bazuten, –parrandari eta arlote fama zeukatelako-, pentsa emakumeengan zer izango zen.

Tokiz eta orduz gainera, bertsolaritza parranda giroari lotua izan da gehienbat. Ardo, sagardo edo edariren bat inguruan dela. Badakigu gizonak ere ez zirela tabernan edo sagardotegian bakarrik biltzen. Auzo-lanak, gaubelak, gari ebakitzeak, hermandadeak eta abar, bazen jendea biltzeko hainbat aukera. Baina ez ziren bertsotan hasiko. Horretarako umore puntu batera heldu behar zen eta hori gehienean edanak zekarren. Auzo-lanek, txerri hiltzeek eta abarrek ematen zuten, bai, horretarako aukerarik, baina lanak bukatu eta gero. Eta beti jan-edanaren ondoren eta gehienean gauez. Dena jota, ez zen gizarte hark emakumeari ematen zion toki soziala.

Ehuneko portzentaia handi batez, esaniko honi dagokio emakume bertsolaririk ez izatea. Hala ere, gauzak ez dira arrazoi bakarrekoak izaten. Emakumeak ere Euskal Herrian batu izan dira, euren bigirak eta tertuliak eginez. Batez ere *kalea* zeukaten herrietan. Baserriko emakumeek ere, gutxienez igande arratsaldeetan eta beste egun seinalatuetan, biltzen ziren noski, solaserako, kartetan egiteko eta abar. Bilera horietan ordu batzu behintzat elkarrekin pasako zituzten, merezi aina ez bazen ere, batez ere baserriko emakumeengan. Bazen, beraz, emakumeen arteko gizarte bat.

Zergatik modu horretako gizartean ez zen bertsolaririk sortu? Zergatik ez zuten bilkura horietan bertsoetara jotzen? Gizonengan, berriketaldi bat egin ondoren, azkenean bertsoetara jotzea normala zen. Artzainengan normala zen bezala. Mendiko artzainek apenas zapaltzen zuten tabernarik edo sagardotegirik. Euren artean bost edo sei artzain biltzen baziren, ordea, bertso saio bat egitea edo saiatzea oso gauza normala zen. Emakumeek elkarrekin biltzen zirenean, zergatik ez zuten hori bera egiten?

Norbaitek esan lezake, emakume ezkonduek zaletasun hori edukitzeko, aurretik ekarri behar dela joera, neskatatik alegia. Hemen ere berdintsu esan beharra dago. Neskak elkarrekin asko biltzen ziren, gizarterik itxienean eta mutilak baino erreztasun gutxiagoz bazen ere. Baina biltzen ziren eta elkarrekin dibertitzen eta elkarrekin egoten saiatzen ziren. Zergatik ez zen bertsolari tradiziorik sortu? Badirudi taberna edo sagardotegiko *toki soziala* baino zerbait gehiago ere badagoela hor. Ez dugu esan nahi emakume bertsozalerik eta bertso jarrien kantatzailerik izan ez denik. Izan dira bat-bateko bertsoak kantatzen saiatzen zirenak ere. Baina ez tradiziotzat jotzeko aina.

Garai haietatik hona, gizartea dezente aldatu da toki sozialari buruz. Duela urte batzutatik honantz, neskak mutilak dabiltzan tokietan eta orduetan ibiltzea nahiko normaldu da. Orain ere badira diferentziak noski, baina gaur neskei gizarteak, erlatiboki, duela berrogei urte mutilei baino gehiago barkatzen die. Horrek esan nahi du gaur, emakume artean ere, neska artean batez ere, bertsolaritza sortzeko aina toki sozial badagoela, nahi badute edo gustatzen bazaie behintzat.

Badakigu honelako tradiziorik ez dela behingoan sortzen. Baina **gaur** esatean, urte mordo batetik honantz esaten ari gara. Aspaldion neska-mutilen ibilerak asko berdindu dira. Beraz, mutilengan bezala neskengan ere bertsolaritza sortzeko baldintzak badaude. Sortzen ez badira, gizarteko matxismoaz gainera, beste arrazoi batzu ere jo beharko dira. Honela, neska artean zaletasuna gorantz datorrela dirudi. Gertatzen dena zaletasun horrek masibo samarra izan behar duela, bertsolariak askoren artetik sortzen baitira.

Gaur ez dago, horretan behintzat, matxismoari erru guztia botatzerik. Gaur nahi duten neskek badute aukera, ia mutilen pare. Tradizio masibo bat finkatzeko aitzaki bakarra denbora behar dela. Hor dago erronka gaurko emakume euskaldunentzat, neskentzat batez ere. Erronka hori jasotzen hasiak dira. Segur nago jaso ez ezik, garaile irtengo direla. Ea bertsolaritza mistoa noiz ikusten dugun. Bada garaia. Baita gogoa ere, nire aldetik behintzat.

Emakume bertsolariei buruzko aurreko guztia liburu honen lehen edizioan idatzia da, 1981. urtean. Bitarte horretan bertsolaritzan aldakuntza handiak izan dira, emakume arloan batipat. Pozik esan dezakegu orduan gogo bat besterik ez zena gaur egia dela. Aitor dut duela zenbait urte erdi etsia nintzela. Bertso eskoletan eta abar, neskak mutilen pare zebiltzan, bai kopuruz, bai kalitatez. Baina adin bat iristen zen, non neskek atzera egiten zuten. Ez ziren plazaratzen, edo oso iheskor egiten ziren. Agian gaztetxoen txapelketaren batetan nabarmenduko ziren eta gero betiko ezabatu. Hamaika aldiz entzun behar izaten nuen:

– Ari haiz hi emakumeak ere bertsolari izan daitezkeela, denbora bat eman behar zaiela eta abar predikatzen, baina hemen ez zetorrek inor.

Urte batzu badira honelakorik entzun ez dudala. Gaur zorionez bada neskarik bertsolaritzan eta indartsu gainera. Agian proportzioa gehitzea desira liteke, baina bertsolaritzaren gizonaroa historira pasatua da. Arlo horretan beste aro batean gaude, lehengoa baino ederragoan duda gabe.

## EUSKALDUN BERRIAK BERTSOLARI

Hona hemen noiznahi egiten den beste galdera bat: *Euskaldun berriak ba al du bertsolari izaterik?* Erantzuna beste galdera sinple bat da: *Zergatik ez?* Zenbait topiko edo aurriritzi airean ez balebil, galdera hori ez litzateke egin ere egingo. Baina oraindik euskaltasunari buruz zenbait dudamuda dagoenez gero, berez bistan behar lukeen erantzuna zerbait oinarritzen saiatuko gara.

Euskaldun berrien arazo nagusia euskaraz ondo ikastea da. Eta euskararen barruan hizkuntza mintzatua. Gauden garaian ez ahal da euskaraz ikasterik ez dagoela sinesten duenik, euskararen beraren barne eragozpenengatik behintzat. Beste kontu bat da gizarte honetako egiturak euskaraz ikasteko bide eta motibapen gutxi ematen duela. Baina gaur inork dudan jartzen ez duena da euskararen iraupenak eta aurrerapenak euskararen berreskuratzea

eskatzen duela. Ez da eustea bakarrik, irabaztea baizik. Berreskuratzeak batez ere euskaldun berriengandik etorri behar du, ez dakitenek ikasita alegia. Hori lortuko den eta batez ere masiboki lortuko den beste gako bat da. Gako latza noski. Eragozpen nagusia ez da hizkuntza bera, inguru eta egitura soziala baizik.

Erdaratik datozenek euskaraz ikasten badute, ez dute noski hizkuntza hutsa jasoko, hizkuntzaren inguru guztia baizik. Horretan bertsolaritza berbertan dago. Euskaldun berria hizkuntzara integratzen baldin bada, zergatik ez da euskal kulturaren barruti osora ere integratuko? Normala da hori. Bestea litzateke anormala, alegia, hizkuntzaz jabetu eta beste ezer ez jasotzea. Euskara eta euskal kultura elkarri lotuegi daude, arlo batzu hartu eta beste batzu utzi ahal izateko.

Hizkuntzaz jabetu arren, baliteke bertsozale ez izatea. Horretan euskaldun berriak ez ezik, euskaldun zaharrak ere ez dauka bertsozale izan beharrik. Bertsolaritza arte bat eta kirol bat da, besteak bezain optatiboa eta, beraz, denei gustatu beharrik ez daukana. Aski da askori gustatzea, arte herritarra eta masiboa dela esateko, nahizta beste askori ez gustatu. Euskaldun berriak ez dauka bertsolaritza gustatzeko obligaziorik, baina euskaldun berri asko sortzen badira, horietatik portzentaia bati bertsolaritza gustatzea gauzarik normalena da.

Gainera euskaldun berriek, bertsolaritza maite izateko, aurre-joera handi bat daukate. Euskaraz ikastea ez da lan erreza. Hori egiten duenak seinalea gogo handia eta kontzientzia harkorra daukana. Alde horretatik euskaldun berria euskaldun kualifikatua dela esan genezake. Euskaraz ikasteko hainbeste ahalegin egin duenak euskal kulturaren beste osagaiak ere gehiago estimatzeko probabilitatea dago. Euskaldun berria, batez beste, euskal kulturako adar ezberdinei buruz, sentikorrago da. Hain zuzen sentikortasun horrexek eraman du euskaraz ikastera ere. Jabetzea hainbeste kostatu zaion kultura berria jakinkiago maiteko du eta bizikiago eutsiko dio. Gizarteak arras hartaratzen ez baldin badu, hark nekez galduko edo baztertuko du euskara.

Euskaldun berriak, beraz, bertsolaritzaz zaletzeko indar afektibo handiagoa dakar. Hauen artean euskaldun zaharren artean baino bertsozaleen portzentaia handiagoa izatea normalena da. Beste gauza bat euskaldun berri gutxi izatea. Kontua ez da titulu bat ateratzea, euskara menperatzea eta erabiltzea baizik. Euskaldun berri osoez ari naiz, ez nola-halakoez. Hauek ere sortzen dira eta sortzen direnetarik, portzentaia handi bat bertsozale izango den dudarik ez izan.

Bertsozale baldin badira, zergatik ez bertsolari ere? Ez dago aldez aurretik inolako ezinik. Bertsolariek, jakina, bertsozale askoren artetik sortu behar du edo sortu ohi da. Bertsozale asko izateko, euskaldun berri asko sortu behar. Euskararen berreskuratzea benetakoa izango bada, hori ere ikusi beharko dugu. Bestela ez gaude itxaropen ederrean.

Euskaldun berriak ugari direnean, euskararen berreskuratzea masibotzen denean, euskarak eta euskal kulturak ere asko igarriko diote, bai azalez eta bai mamiz ere. Euskalduneria berri horrek pisu eta aldakuntza kualitatiboa ezarriko dio euskal kulturari. Hortik datorkeen mundua eta baserri girotik hartu duguna ez dira noski berdinak izango. Bertsolaritzak berak ere igarriko dio, beste bertsozale mota bat sortuko baita. Are gehiago euskaldun berrien artetik bertsolari asko eta onak sortzen badira. Aldakuntza hori nolakoa izango den gaur antzematerik ez badaukagu ere, egun hori lehenbaitlehen ikus dezagula.

Euskaldun berriei buruzko aurreko lerrook ere 1981. urtean idatziak dira. Gutxi gorabehera gaurko ere balio dute. Euskaldun berrietan bertsozaleak badirela berretu besterik ez. Hamaika aldiz probatu dugu entzule gisa onenetarikoak direla. Bertsolari gisa, lagunartean poliki moldatzen direnak badaude. Plazako figura gisa ez dira oraindik hainbeste nabarmendu. Lasai. Jaioko dira berriak inork uste ez duen lekutik, hau ez zen agian Xenpelarren pentsakeran egongo baina.

## BERTSOLARI AHALMENAK

Hona sarritan gertatzen den galdera: *Zer ahalmen edo baldintza behar da bertsolari izateko?* Galdera hau beste edozein arlotan ere egin ohi da. Askok eta arlo askotan egiten dena gehienean nahiko galdera tentela izaten da. Zer behar da musikari izateko? Zer behar da matematikari izateko? Zer pintore, pilotari, tratulari, aktore eta abar izateko? Galdera hauek, labur erantzuteko egiten badira, galdera tentelak dira. Zientzia edo arte bakoitzak bere barruti zabala dauka. Bakoitzak bere teoria edo testua edo sistemakuntza dauka. Hona zer erantzun daitekeen: *Begira. Horretaz badaukazu tratatu teoriko bat, gai horren legeak eta izaera aztertzen duena. Ikas hura eta egin aproba. Horixe da behar dena.*

Bertsolaritzaz ere berdintsu esan daiteke: *Azter eta ikas liburu hau eta hemen esaten direnak betetzeko gauza bazara, bertsolari izango zara.* Erantzun tentela al da hau? Bai agian, baina ez hainbeste. Liburu honetan bertsolaritzaren legeak eta dinamika aztertzen saiatzen gara. Ikus eta egin aproba. Bertsolari izateko, liburu honetan esaten diren guztiak behar dira gutxienez. Hau gutxiena edo minimoa duzu. Hortik gora bideak zabalik daude. Galdera eta erantzuna hain tentel gera ez daitezen eta, laburki erantzuterik ez dagoela emanik, liburu honetan bertsolaritzaren teknika edo azala aztertzen da. Bertso bati hiru gauza egiten zaizkio: kantatu, neurtu, errimatu.

Kantuari buruz, esan dezakegu, bertsolari izateko, ez dagoela musikari handia izan beharrik. Bertsoak eskatzen duen kantua nahiko erraza eta nornahiren esku dagoena da. Beraz, honetan eskatzen den bakarra belarri txarrik ez edukitzea da. Badira hauetariko kasuak, baina gehienak aisa iristen dira

belarri oinarrizkora. Hortik aurrera, belarri oso ona edukitzea edo oso ondo kantatzea alde on bat izan daiteke, baina ez funtsezkoa. Horretan badakigu abotsak ere ezberdinak daudela. Baina bai abots, musika, belarri eta kantaeran, bertsolaritzak eskatzen duen minimo lasaia gehienen esku dago.

Bigarren osagarria neurria da. Kantatuz egiten den neurria hain zuzen. Honek bai badauka bere zailtasuna. Hau ez da nornahik lortzen duena. Hain zuzen liburu honen zati handia horri dagokio. Bertsotan neurria dantzan ritmoa bezalatsu da. Ritmoa ez da gauza bat, gauza pila baten konbinapena baizik. Gauza horiek era batera azaltzen dira eta orotasun horri ritmoa esaten zaio. Hala esaten da: *Horrek berehala ematen dio antza. Berehala hartzen du ritmoa. Aparteko grazia dauka dantzarako.*

Aparteko grazi horrek bere legeak dauzka, dantzaren teorian banaka eta luze aztertuko direnak. Bertsolaritzako ritmoa neurria da. Ondo neurtzeko, gauza asko egin behar da era batera. Bertsoa hitzekin osatzen da eta horiekin joko asko egin daiteke. Neurriak nahitaez joko batzu eskatzen ditu. Zeintzu dira joko horiek? Liburu honetan aztertzen saiatzen garenak.

Joko horiek oharkabez egiteak ez du esan nahi ez direla egiten. Ohartuz ala oharkabez, beharrezko joko batzu daude. Beraz, neurriaren sen hori, ritmoaren ahalmen hori, beharrezko da. Nola jakiten da dagoen ala ez? Probatuta. Batzuk hartara jakinki jarri gabe egiten dute proba. Berezko bertsolaritza esaten zaiona. Beste batzuk bereziki edo hartara jarririk proba dezakete. Beste batzuk bietara. Baina denek aproba eginda. Hortik ez dago apartatzerik. Beraz, ez da hain berezkoa. Beste gauza bat da aisago ala nekezago aurreratzen den.

Neurriaren sen hau, ritmoaren ahalmen hau, ez da hain lorterreza. Kantatzeari buruz, minimoa gehienen esku zegoela esan badugu, neurriaren minimoa nahiko goi dago. Neurriak ez du zaulitasunik onartzen. Zehatza eta estua da. Abots ezberdinek nahiz kantaera ezberdinek garrantzirik ez daukaten bezala, neurrian ez dago hauspo legerik. Neurri mota ezberdinak izango dira, baina bat hartutakoan, huraxe zehazki eraman behar da. Horixe da zailena. Nondik ateratzen da hori? Esperientzitik. Esperientziak dio bertsogintzaren sailik zailena neurtzea dela.

Neurria menderatutzat emanik, bigarren sail nagusia errima. Berez errimaren minimoa ez da hain zaila. Edozein haurrek asmatzen ditu lau hitz errimatu. Beste gauza bat da hitz horiekin zer egin. Nola josi, zer esan. Eta batez ere nola neurtu. Neurria gutxiena eta gehiena, behea eta goia, ia bat dira. Minimora heltzeak gehiago ez dela behar esan nahi du. Erriman, ordea, minimotik maximora bide amaigabea dago. Minimoa errez samarra bada ere, hortik gora ez dago goirik. Horregatik, behin neurria menderatutakoan, errimatik dator zabalkundea eta hobekuntzaren sail mugagabea. Hau ere liburu honetan aztertzen dugu eta, neurria bezala, probatu gabe ez dago jakiterik. Nolanahi ere, bertsolaritzaren minimora heltzeko, ez da errima sailean dohai zorrotzegirik behar, neurrirako bezala.

Bertsolari izateko, beraz, hiru osagai hauek beharrezko dira, esaniko mailaketan. Bertsolaritzaren teknika objetiboa esango genukeena. Badira, ordea, beharrezko diren baldintza edo ahalmen psikologiko batzu ere. Baldintza subjektiboak, alegia. Horietan sarritan aipatzen diren dohai mentalak. Oroimen azkarra, erreflexu bizkorrak, hizkera egokia, bizitasuna, irudimena eta abar ezer gutxi adierazten duten hitz zabalak dira. Edozein artek edo jardun intelektualek horietatik asko behar du. Bertsolaritzak horretan eskatzen duen minimoa ez da hain lorgaitza.

Zerbait esatekotan, zaletasuna aipatuko genuke. Nahiko tentelkeri bada ere, nabarmentzea komeni da. Zaletasun horren minimoak nahiko handia izan behar du. Bertsolaritzak ekite handia eskatzen du eta horretarako zaletasun beroa behar da. Gustatzea ez ezik, asko gustatzea. Baliteke dohai objektibo horiek edukitzea, baina gustatzen ez bazaio, ez dago zereginik. Okerrago da alderantziz gertatzea, alegia, asko gustatzea eta dohaiak falta izatea. Hori ere gertatzen da eta gertatzen zaionak nahiko zorigaitz darama aldean. Gehienean, ordea, zaletasun handia hartarako dohai oinarrizkoekin bateratsu joaten da. Hori ez da bertsolaritzan bakarrik gertatzen dena. Esan dezagun, beraz, zale itsua ez bada ere, zale handia izan beharra dagoela eta hori bakoitzak bere baitan neurtzen du.

Inoiz originaltasuna ere aipatzen da. Nik ez dut hainbesterik uste. Jendeak pentsatzen duena edo dakiena bakarrik kantatzeko gai izatea nahikoa da, bertsolariaren minimoa lortzeko. Ezer berririk sortu gabe, nornahik dakiena neurtuz eta errimatuz kantatzea aski meritu da. Horrek ez du esan nahi originaltasunak garrantzirik ez daukanik. Hemen minimoaz ari gara.

Minimo horretan bertsolaritzak badu alderdi subjektibo oso berezi bat: *Plaza gizona* esaten zaiona izatea. Honek atal berezia merezi du.

## PLAZAGIZONA EDO PLAZAGINA

Lehenbizi esan dezadan esamolde hau arkaiko geratu zaigula, emakumeak plazaratzen hasi direnetik. Neska batek ere *plaza-gizona* izan behar al du? Bera, *plaza-gizon* eta *plaza-emakume*, edo *plaza-mutil* eta *plaza-neska*. Biena adierazteko modu bat ez legoke gaizki. *Plazagin* agian? Bera hartuko dut, laburra eta polita iruditzen baitzait.

Plazagin edo jende aurrerako gai izatea ez da bertsolaritzan bakarrik behar dena. Kantari, antzezlari, hizlai, pilotari, probalari eta abarretan badakigu faktore horrek asko balio duela. Baina bertsolaritzan indar berezia dauka, sortzea eta interpretatzea era batera egiten direlako. Beraz, entzuleriak askoz proportzio handiagoan jotzen du bertsolaria.

Alde batetik plazagin izateak jendearen aurrean ez murriztea, ez moztea, ez txikitzea esan nahi du. Edo hobeki esanda, ez gehiegi txikitzea, entzuleak eragiten ez dionik ez baitago. Ez da nerbioak menderatzea bakarrik.

Entzuleriak dohaien halako itomen edo paralizatze bat eragiten du. Hori ez gertatzea edo gutxi gertatzea lortu behar da. Ez da hainbeste lotsa edo bildurra galtzea, horren aurka paratxokeak sortzea baizik, eta hauen bidez, norbere buruarekin oinarrizko konfidantza bat lortzea.

Bildurraren, nerbioen edo zirintasunaren ariera ez da beti arrazionala izaten. Horren kontra mentalizapen psikologiko gogorra behar da. Bildur irrazionalak daukanik txarrena da arrazoiz menderatu behar dela. Alegia, bildurrak abantailaz edo traizioz jokatzen du. Bera arrazoi gabe sor liteke, baina kentzeko, arrazoiak behar dira eta gogorrak gainera.

Zeintzu dira arrazoi horiek? Bertsolaritzaren minimoak betetzeko gai dela norbere buruari sinestarazi. Traizio psikologiko horri buelta emateko aina badela sinetsi. Konfidantza oinarrizko hori hartu. Hau ez da egun batean edo bitan lortzen. Jardun luzea, oso luzea da. Auzia ez da hainbeste nerbioak menderatzea edo urduri ez egotea, burua ez iluntzea baizik. Nerbioso edo tentsioan egon arren, burua argi badago, bertsolari ona izan liteke. Gertatzen dena, gehienean, puntu bateraino behintzat, bi faktore horiek elkarrekikoak edo korrelatiboak direla. Eta ahalbide hori gertaturik ere, hots, norbera tentsioan baina burua argi edukirik ere, sufrimentu handiegia da, luzaro eusteko. Ez du ematen. Edo bestela bizio edo itsutasun handia behar da.

Plazagin izatearen alderdi negatibo honetaz gainera, badago behar den zerbait positiborik ere. Ez da jende aurrean ez kikiltzea bakarrik. Jendearen eragin positiboa hartzeko gai izan behar da. Berotzeko, entzuleak arrastatua izateko dohaia behar da. Baliteke nerbioen edo itoera horren eraginez, alde batetik txikitzea eta bestetik eta era batera berotzea eta hala bere buruaren neurri normala gainditzea. Aurrekoak paratxokeak baziren, hauek altxagailuak dira, bertsolaria gehitzen eta bidertzen dutenak. Ez hutsetik noski. Mekanismoak barruan ditu, baina entzuleak abiarazten dizkio edo bizikiago ibilarazten.

Plazaginak, beraz, bi gauza era batera esan nahi ditu: alde batetik ez txikitu eta bestetik handitu. Jende aurrean *hazi* esaten dena. Beste gauza bat da jende ezberdinen aurrean ezberdinki txikitzea edo haztea. Badira jende eta okasio ezberdinak, eragin ezberdina egiten dutenak: mahaiondoa, lagunartea, plaza, zinema eta abar. Plazetan ere ez da berdin mendiko ermita, kaleko mitina, zaharren omenaldia, pilotalekuko jaialdia eta abar. Baina denak dira jende. Bertsolari batzuk batean eta beste batzuk bestean, eragin hori ezberdinki sentituko dute, bai onerako eta bai txarrerako.

Ederrena jende eta okasio mota guztietan *haztea* eta inoiz ez txikitzea litzateke. Hori lortzerik ez dago. Ez dago bertsolaririk, entzuleriak eragiten ez dionik. Hil arteko zerga da hori. Hauxe da hain zuzen, bertsolari izateko ahalmen guztiak edukirik, askok eta askok aurkitu duten oztopo gupidagabea. Hortik dator muturra berotu beharra, hortik gaueko hamabietatik gora nornahi bertsolari izatea. Oztopo objektibo gogor bat badagoelako. Hortxe jo dute askok larakoa eta aurrerantzean ere joko dute. Beste edozein artetan plazagin izatea garrantzitsu baldin bada, bertsolaritzan areago, era batera sor-

tzen eta interpretatzen baita. Hauxe da bertsolaritzan selektibitate gogorra ezartzen duena edo ondo probatu gabe jakiten ez dena. Ez da lehen astean edo hilean desanimatu behar, baina bai jakin oztopo hori gainditzea ez dela, orain arte behintzat, gehienek lortzekoa izan. Horregatik da hain beharrezko zaletasun ia biziosoa.

**KANTATZEKO AUKERAK:** Bertsolari izateko zer behar den galderari, probatu erantzun badiogu, orain nola proba daitekeen galde dezakegu. Zorionez, gaur egun aukera horiek asko eta askotarikoak dira, eskola, bertso-eskola eta abar. Hemen konparazio bat egin nahi nuke. Lehen ala orain dago kantatzeko aukera gehiago?

Lehengo gune batzu desagertu edo aldatu egin dira. Gaur tabernak, sagardotegiak, erromeriak, igandeak, gazteriaren hara-honak... guztiz ezberdinak dira. Lehenago bezala, edozein tabernatan sartu eta bertsotan hasterik ez dago: telebista edo musika martxan dago, agian gehienak erdaldunak dira eta abar. Bertsotan aritzeko moduko euskal guneak desagertu egin direla pentsa daiteke.

Baina beste batzu sortu dira. Baita beste ahalbide batzu ere, bai bertsolariak eta bai jendeak mugibide gehiago daukalako. Jaiegunak gehitu eta luzatu egin dira. Orain dibertsioak ordu gehiago hartzen du. Ez naiz hasiko xehetasunak ematen, baina konbentziturik nago gaur lehen baino askoz aukera gehiago dagoela kantatzeko. Anbizio apur bat daukanak edozein egunetan aurki dezake bertsotan aritzeko egokiera. Bertsolaritzak gauza bat dauka oso ona praktikatu nahi dutenentzat eta da ia inolako azpiegiturarik ez duela behar. Bi abots eta dozenerdi entzule aski dira, bertsolaritzaren egintza osoa burutzeko. Ez da behar antzokirik, soinu ekiporik, argi-jokorik, zelairik... Ez da behar ezer, norbere antzeko bat eta entzule batzu besterik.

Entzule horiek non aurkitu? Ia edonon esango nuke. Eta zer esanik ez jai inguruan gabiltzanean. Inoportunoa ez izateko sen minimo batez, edozein ostiral, larunbat, igandetan eta ia edozein herritan aurki daiteke ordulaurden bat eskaintzeko prest dagoen entzuleria. Baita gehiago ere, bertsolaria martxa animatzeko gauza bada. Aste barruan ere gune horiek aurkitzea ez da zaila herri handi samarretan.

Aukerak bistan daude eta bistan dagoena ikustea ez da zaila. Gogoa eta atrebentzia behar dira. Anbizioa. Hori beste kontu bat da. Beharbada gaztetxoak ez dira aukera horietaz jabetzeko edo euren kontura baliatzeko gai. Horiei argi dago nagusiek lagundu behar dietela, hala komeni bada. Baina behin hamasei bat urtetik gora doanak ez luke inor behar, nahi aina aukera aurkitzeko. Gaur lehen baino euskal gune gehiago dago eta euskaldunen aldetik bertsolariak entzuteko predisposizio hobea ere bai leku askotan, bertsolaritza agian prestigiatuago dagoelako. Ostiral edo larunbat iluntzean irten denetik goizalderarte hainbeste zirritu korritu dituen gazteak bertsotarako aukerarik aurkitu ez badu, irudimen motza dauka. Beste gauza bat da behar-

bada ez dela pentsatzen hasi ere egin. Orduan gogoeta soil bat egitea aski du, aukerak eskuan dauzkala ohartzeko.

Aukera diodanean, *kantatzeko aukera* esan nahi dut, ez *kobratzekoa.* Batzutan susmoa daukat, kantatzeko aukerarik ezaz kexatzen denean, bestea esan nahi ez ote den. Kiroletan ere, bizikletan adibidez, hor ikusten dira gaztetxoak andanan entrenatzen, sosik kobratu gabe, geroaren itxaropenean, edo kirola maite dutelako beste gabe. Esan nahi dudan bakarra da –eta ez da gutxi– bertsolaritza probatzeko, praktikatzeko, aurreratzeko, gozatzeko... kantatzea nahitaezko bada, gaur ez dagoela aukeren aitzakirik.

## SAIO INTEGRALA

Lehen edizioan *Gaiak eta Gai jartzaileak* izeneko kapitulu bat zegoen. Gai jartzailedun jaialdiak geroztik eredu nagusi izan dira. Nahizta agian ez ugarienak izan, bai izan dira ebazkorrenak, irrati, telebista eta abarretan gehien emanak izan direlako. Gaur ere eredu horrek nagusi jarraitzen du. Norantz joan liteke hurrengo eredua? Horixe da kapitulu haren ordez orain iradoki nahi nukeena.

Zer izenburu jarri pentsatzen ari nintzela, *Saio integrala* bururatu zait eta bera uztea erabaki dut. Adjetibo horrek hots jagia eta baikorra dauka oraindik, eta aprobetxatu egin behar dut, zerbait pedantearen sinonimo bihurtu aurretik. Ideek sarritan izenagatik korritzen dute eta ea orain botatzera noanari zorte bera dagokion.

Saio integrala zer litzatekeen? Oso sinplea: bertsolariek eurek dena egiten dutena, gaijartze eta kantatze. Saio asko egiten da, bertsolari bat gai jartzaile dela. Baina bertsolari hori saio horretan ez da bertsolari, hizlari baizik. Gai jartzailearen lana egiten du soilki. Nik diodan ereduan ez dago bertsolariez beste inor saioan. Eurek kantatzen eta eurek gaiak jartzen dituzte. Nola? Dakusgun.

1) Bertsolari bat saioaren gidari. Honek gai ezberdinen ardura darama, baina besteek bezalaxe kantatzen du. Une jakin batean hitz batzu ere esan ditzake. Bertsolari bat diodan bezala, denak izan daitezke txandaka, inor gai jartzen dabilenik entzulea ohartu ere egin gabe. Baina gidaritza kolegiatua konplikatu samarra gerta daitekeenez, utz dezagun bakarrean. Edo bian, ez baita zaila zenbait unetan beste batek ere ardura hori hartzea.

2) Saioaren batasuna. Eredu honekin saioaren batasuna aisa eraman daiteke aurrera. Batasun hori emango duten argumentuak edo gidoiak mila izan daitezke. Halako bereizpen argigarri bat emateko, hiru mota aipatuko ditut.

a) Gai edo idea jakin bat, argia, dudagabea: ekologia, insumisioa, euskara, zurruta, bakartasuna, lana, loa... b) Erreferentzi gune bat, giro bat: mendia, goizaldea, jaikiera, eskola, gaztetxea, bidaia, gaupasa... c) Inguru edo erreferentzi anizkoitz bat, interpretazio ezberdinak sorreraz ditzakeena.

Gaia edo haria, beraz, nabaria, esplizitua izan daiteke, argi adierazia eta entzuleen zalantza gabe ulertua. Edo inplizitua, badagoena baina adierazten ez dena. Kokagune soil bat izan daiteke, itsasoa adibidez, zeinaren gainean edo barruan mila gertakari ezberdin jazotzen den. Jendeak ez dauka erreferentzi horretaz ohartu beharrik, ezta beste bertsolariek ere agian. Hori bertsolari-gidariaren baitan, erakuntzan dagoen edo egon den elementua da. Gero agian entzule batek esan dezake: *Joño! Hemen saio guztia ur gainean egin diagu!* Edo: *To! Saio osoa gela batetik irten gabe joan zaiguk*. Hori gero deskubritzen du, egiten badu. Edo gauza diferenteak deskubritzen dira, interpretazio ezberdinak bidezko baitira. Sentipen anizkoitz eta zehazgabe hori sorraraztea polita, artistikoa litzateke. Azken batez, argumentu bati jarrai, eskenatoki ezberdinak korritzea litzateke, edo bestela eskenatoki handi bat imajinaturik, ekintza guztia haren gainean garatzea.

3) Batasun formala. Esaten ari naizen batasun horrek ez dauka nahitaez argumentuzkoa izan beharrik. Oraingo gaijartze eskeman egiten den berbera egin daiteke, gai solteak eta bata-bestearekin zerikusi hurbilik gabeak kantatuz. Jaialdiaren batasuna orduan formala edo itxurazkoa da soilik, halako ordena eta egitura externoa daramana.

4) Eredu honen ahalbideak. Eredu hau ez dago bestearen aurka edo baztertzaile gisa ikusi beharrik. Hark bere izaera dauka eta honek beronena. Hala ere, beste ereduaren ahalbide guztiak eta gehiago dauzkala uste dut. Guztiak esatean, gai jartzaileak jar ditzakeen gai guztiak honela jar daitezkeela esan nahi dut. Galtzen den bakarra aurkezleraren presentzia da. Eta *gehiago* esan dut. Zertan?

a) Eredu honek beste ereduak ez daukan garanti asko dauka. Bertsolariak ofizioa gai jartzaileen batez-besteak baino hobeto ezagutzen du. Zenbait gai jartzaileren gogorik onenaren ezuste desegokietatik salbo gaude. Egin litezkeen esperimentu berriak ere bertsogintzaren ezagutzatik edo ezagutza handiagotik eragiten dira. Hitz batez, esku segurragoan gaude.

b) Saioan gertatzen ari den uneaz, sortzen ari den egoeraz konektatu ahal izatea. Normalki gaien egitura saioan zehar aldagaitza da. Aurrez nola pentsatu, halaxe botatzen da, martxan norabiderik aldatu gabe, eta gai jartzaileek hobe dute horrela egin, aldakuntzak inprobisatzen hastea arriskutsua izan baitaiteke. Baina saioaren martxa bertsolariek barrutik eramanez gero, hori litekeena da, litekeena den bezala entzuleen erreakzioak edo saioan zehar gertatzen diren mila xehetasun gidoiratzea, bat batean egin ohi den antzera.

c) Bertsolari guztiek jarrera aktiboa daukate. Ez daude zain, gai jartzaileak zutitzeko noiz aginduko dien zain, norbera osagarri eragile bat den bilakaera bat aktiboki jarraitzen baizik, edozein unetan gidaritza hartzeko prest eta hartarako okasio bila. Antzerki bateko aktorea orotasun baten atal aktiboa den bezala. Orotasun hori bizi egin behar du, jarraitu egin behar dio, bere interbentzioa eranskin mekaniko soil bat besterik izango ez bada. Bertsolarien kasuan, gidoian ez leudekeen interbentzioak aporta ditzake.

d) Gai jartzaile esterno bati edo batzuri ere eman dakieke tokia. Une batean han azaltzen da norbait, antzerkiko pertsonaia bat gehiago bailitzan, halako edo bestelako gaiak jarriz. Eta beste une batean agertu bezala desagertzen da, banator ez banoa esan gabe. Eredu honen barruan, beraz, orain arteko gaijartzaile figurak baluke tokia, orotasunaren osagai bat gehiago bezala.

e) Aurretik edo egunean bertan, kantatu behar den herriko edo inguruko zenbait informazio jaso daiteke, oso errez eta inolako azalpen espliziturik gabe saioaren egituran sartzekoa, bertsogintzari bertako kolorea eta lekutasuna ezarriz eta entzuleei ezuste deigarriak emanez.

f) Auto-kritikarako modua. Eredu honen alderik emankorrenetakoa izan daiteke hau. Bertsolarien zirkulua nahiko batua eta interes berdintsukoa izanik, eginaren kritika eta egitekoaren plangintza aisa eraman daiteke. Eta hori bide batez, hartara sistematikoki jarri gabe egin daiteke, elkarrekin ari behar baitute. Gaigartzailedun ereduan hori oso zaila da, praktikan ia ezinezkoa. Gai jartzailea ez da bertsolarien zirkulukoa, oso figura aldakorra da –hemen bat, han beste bat–, eta oro har ezin da harekin harreman organikorik taxutu. Ondo irteteko zortea izan bada, ondo eta hurrengorarte. Hurrengo hori hurrengo urtea izan daiteke, edo agian inoiz ere ez. Eredu integralean okerren zuzentzea eta idea berrien lantzea bertsolarien esku dago, aparteko ahalegin handirik gabe. Ia ebitagaitza dela esango nuke, martxak berak eskatzen baitu.

Kontsiderapen teoriko guzti hauen oinarria nahiko praktikoa da berez. Gai jartzea txapelketarako asmatu zen, bertsolariak neurtzeko nola-halako froga konbentzionalak behar baitziren. Baina ez noski txapelketarako bakarrik. Bat bateko bertsolaritzaren ibilera, duela urte gutxi arte, librea izan da. Adinean aurrera samar goazen bertsolari guztiok ezagutu dugu haro hori, non ia beti librean jarduten ginen, gai jartzailedun saioak salbuespenak zirela, baldin baziren.

Ibilera libre hori nahiko mugatua zen. Bertsolaria –demagun Txirrita– esparru txikian mugitzen zen. Hura oso ondo ezagutzen zuen, baina handik kanpora zenbat aldiz irtengo zen? Urte batez hamairu plaza egin izana gauza handitzat kontatzen omen zuen. Bizkaira behin bakarrik iritsi zela dirudi, Mendexara hain zuzen. Gerra ondoren bertsolari batzu maizago eta urrunago mugitzen hasi ziren. Baina entzuleak eta bertso giroak nahiko lehenean zirauen. Librean eta bakoitzak zekienarekin aski zuten, bertsolaritzaren funtzioa betetzeko.

Denbora laburrean panorama erabat aldatu zen. Ibilgailuekin batera, –motorrak eta lehenengo kotxeak– saioak asko gehitu ziren, hirurogei inguruko txapelketekin hasita batez ere. Bertsolaria gehienik bere esparru ezagunetik kanpora zebilen. Eta horrez gainera eta batez ere, beste era bateko gaien eskea zetorren. Bertsolariak nondik atera behar zuen ezagutzen ez zituen plazetan eta ohiturik ez zegoen, edo haien berririk jakin ere ez zekien gaietan aritzeko materiala? Gai jartzaileak emango zion hori. Hau gabe ez zen

izango bere esparru mugatutik irteteko gai. Horrela disoziazio bat sortzen da: batak gaia jartzen du, besteak gaia jazten du. Batak argumentua dakar, besteak forma eta edukia damaio.

Berez, bai gaia eta bai bertsoa, dena bertsolariak berak egitea litzateke naturalena. Edo gutxienez horrek modu naturaletako bat izan behar luke, besteak baino osoago dirudiena hain zuzen. Librean horixe egiten dugu. Baina lautik gora garenean, ez dakigu nola egin, orain arte behintzat. Duela zenbait urte idea hauek planteatzea alperrik izango zen, baina gaur egun uste dut badaudela bertsolariak, disoziazio hori gainditzeko gai direnak. Lehenago bertsolari eskolatua salbuespena bazen, orain gehienak –laster denak– karreradunak edo karreran dabiltzanak dira. Hauei bertso jaialdien dinamikan aktibotasun gehiago eskatzea ez da harritzekoa.

## KUBAR PUNTUKO DEZIMISTAK

Lehen zati hau amaitzeko, Kubar Puntuaren adibide bat jartzea pentsatu dut. Aurrean daukadan kasetak hitz hauek dakartza azalean:

**PUNTOS CUBANOS. JUSTO VEGA Y ADOLFO ALFONSO. «La pareja más popular de Cuba». Selección de controversias entre estas dos glorias del Punto Cubano.**

Hona hemen kasetean datozen hainbat saioren arteko bat.

Justo Vega: 1) Aquí estamos nuevamente
tras una ausencia marcada
en la atención delicada
del pueblo televidente.
Aquí estamos con la fuente
del arroyo cristalino
aquí estamos con un trino
azúcar, tabaco, palma
trino cubano en el alma
del Cubano campesino.

Adolfo Alfonso: 2) Aquí estamos nuevamente
hechos voz y poesía
llevándole la alegría
a cada televidente.
Aquí estamos frente a frente
en un nuevo mano a mano.
Aquí estamos en el plano
propio de esta discusión
llegándole al corazón
a nuestro pueblo cubano.

J. Vega: 3) Aquí estamos con las tallas
de hombres de mucho renombre
A. Alfonso: Sí. Por ejemplo, aquel hombre
que ha ganado diez medallas. (Txaloak).
J. Vega: Representan mil batallas
ganadas en el trabajo.
A. Alfonso: Así hay muchos en el tajo
en el taller y en la estiva
J. Vega: desde todo vuelta arriba
A. Alfonso: hasta todo vuelta abajo. (Txaloak).

J Vega: 4) Ellos represan el agua
A. Alfonso: cuidan el aire
J. Vega: y el sol
A. Alfonso: que fecunda en el frijol
J. Vega: el plátano
A. Alfonso: y la majagua.
J. Vega: Aquí estamos con la fragua
A. Alfonso: con el yunque,
J. Vega: con el fuelle
A. Alfonso: aquí estamos con el muelle
J. Vega: el pesquero
A. Alfonso y el palangre
J. Vega: para que el sol de la sangre
en las pupilas destelle.

A. Alfonso: 5) Aquí estamos con la oveja
J. Vega: con el cerdo
A. Alfonso: con el pollo
J. Vega: con el merino criollo
A. Alfonso: con la guana (?) (barreak)
J. Vega: y la coneja
A. Alfonso: estamos con la bermeja
J. Vega: con mugre (?) blanca
A. Alfonso: y la fosca
J. Vega: pero matamos la mosca
A. Alfonso: y jupiamos (?) al majar
J. Vega: que en las ramas del guamá
con la hutía se enrosca.

A. Alfonso: 6) Aquí estamos con la siembra
J. Vega: ¡Y con la cría, caracho!
Cuidando al macho por macho (barreak)
A. Alfonso: y a la hembra por ser hembra.

J. Vega: ¿Y eso quién no lo remembra?
A. Alfonso: Tú, que sufres esclerosis
y palidez y sicosis.
J. Vega: ¡No, mi hermano putativo! (barre handiak)
Yo soy un ejemplo vivo
de legítima simbiosis.

A. Alfonso: 7) Pero en esa asociación
de organismos diferentes
desde los pies a los dientes
pocas tus ventajas son.
Tú tienes un corazón
hecho para no correr.
Ya casi no puedes ver
y analiza, pirulí
que la simbiosis en tí
poco efecto puede hacer.

J. Vega: 8) Traigo la sangre de un toro
circulándome en las venas (barreak)
para eliminar las penas
que produce el deterioro.
Traigo en el pecho sonoro
el difragma de un caballo (barre handiak)
y para evitar un fallo
en el alma peripuesta
con espuelas, pico y cresta
traigo la estampa de un gallo. (barreak eta txaloak)

A. Alfonso: 9) Traes de gallo o de gallina (barreak)
una estampa aparatosa
pero que en una caldosa
da muy poca vitamina. (txaloak)
Traes la estampa medio en ruinas
si acaso de un gallo viejo.
Traes la estampa de un cangrejo
de algún patio cuando más
caminando para atrás
y sin levantar parejo. (Barreak eta txaloak)

J. Vega: 10) De un carnero saludable
traigo lo bueno.
A. Alfonso: ¿Y del mulo
qué es lo que traes? (barreak)
J. Vega: Traigo un rulo
de crines muy respetables. (barreak)

| | | |
|---|---|---|
| A. Alfonso: | | ¿Por qué has hecho tan notable |
| | | relación fundamental? |
| J. Vega: | | Por la presencia triunfal |
| | | del encuentro de altivista (?) |
| | | campesino sanapista (?) |
| | | sobre salud animal. (Txaloak) |
| A. Alfonso: | 11) | En la salud animal |
| | | la tensión es permanente |
| | | cuidando celosamente |
| | | ese renglón especial. |
| J. Vega: | | En todo Cuba es igual |
| | | en aquel campo sembrado |
| | | en aquel campo arbolado |
| | | y en aquel que luz (?) reparte |
| | | no existe en ninguna parte |
| | | un animal descuidado. |
| A. Alfonso: | 12) | ¡Sí! Porque la medicina |
| | | veterinaria funciona |
| | | de una zona a la otra zona |
| | | en la vida campesina. |
| J. Vega: | | El encuentro determina |
| | | el desarrollo pecuario |
| | | y si te es muy necesario |
| | | porque tienes mucha urgencia |
| | | aprovecha la presencia |
| | | del doctor veterinario. (Txaloak eta barreak) |
| A. Alfonso: | 13) | ¿Cómo me vas a mandar |
| | | a ver a un veterinario? |
| J. Vega: | | Porque te quejas a diario. |
| A. Alfonso: | | Hoy sí me voy a quejar |
| | | porque esa forma de hablar |
| J. Vega: | | no tiene ningún delito. |
| A. Alfonso: | | Y me has dicho animalito |
| | | no más así porque sí |
| J. Vega: | | yo no lo dije por tí |
| | | lo dije por tu perrito. (Barreak eta txaloak) |
| A. Alfonso: | 14) | ¡Si mi perrito está sano |
| | | porque Roberto lo cuida! |
| J. Vega | | ¿Y quién le da la comida? |

| | |
|---|---|
| A. Alfonso: | Berta se la da en la mano<br>y me retiro liviano<br>porque es mucha tu ironía. |
| J. Vega: | ¡No te vayas todavía! |
| A. Alfonso: | ¿Qué es lo que quieres, maestro? |
| J. Vega: | Darle las gracias a nuestro<br>pueblo por su simpatía. (Txaloak eta aupak) |

Galdera ikurrez ageri diren hitzak ez ditudala identifikatu esan nahi du. Zenbait laguni zinta entzuteko eskaturik ere, ezin izan ditugu hitz guztiak argitu.

Sorta honek erakusten duen bertsogintzan zenbait gauza aipagarri nabari da:

1) «Aquí estamos frente a frente en un nuevo mano a mano» eta «aquí estamos en el plano propio de esta discusión» diote. Bestalde saio hauei «controversias» deritze. Gure bertsolaritzaren buruz buruko dialektika eta joko kutsua garbi dago hemen ere.

2) «En la atención delicada del pueblo televidente» eta «llevándole la alegría al pueblo televidente». Honek esan nahi du telebisioan kantatzen ari direla. Beste saio batean irratian ere kantatzen dute. Puntulari hauek, beraz, Kubako hedabide nagusietan ohizko dira. Horrela ez da harritzekoa azalean «La pareja más popular de Cuba» jartzea.

3) Argi dago bat-bateko jeneroa dela. Saio honetan ez da suertatzen, baina beste batzutan «yo soy un improvisador», «tú no improvisas nada» eta horrelako esaldiak ageri dira.

4) Beti *décima* izeneko neurrian dihardute, doinua ere bera erabiliz. Hortik datorkie *dezimistak* izena ere.

5) Jenero hau Kanarietako emigranteek Kubara eraman omen zuten, hemen jatorrizko lurrean baino garapen handiagoa izan duelarik. Kanarietan hemengo antzinako sagardotegien antzeko giro eta estiloan jarraitzen omen dute. Urtean behin Kubar eta Kanariar dezimisten topaldi-jaialdia egiten dute, batekoek eta bestekoek elkarrekin kantatuz.

6) Kubar dezimista hauek umorea eta poesia kontzientki konbinatzen dute. «Hechos voz y poesía, llevándole la alegría». Bi termino horiek maiz agertuko dira euren jardunean. «Arroyo cristalino», «para que el sol de la sangre en tus pupilas destelle» eta gisakoak ironiarik handieneko pasarteetan kantatuko dituzte.

7) Gairik arruntenetan ere hizkeraren maila kultoa nabari zaie: «relación fundamental», «medicina veterinaria», «esclerosis, simbiosis», «asociación de organismos diferentes» eta gisakoak normalak dira. Beste saio batean, batak besteari zein gorputz-atal emango liokeen dihardutela, anatomia osoa errepasatzen dute, zertaz ari diren badakitela erakutsiz.

8) Batzutan bakoitzak dezima osoa kantatzen du, baina gehienetan bien artean txandatuz osatzen dute. Txanda horiek guztiz informalak, ia arbitrariak, direla ematen du, baina euren artean izango dute legeren bat, bestela zaila baita ahapaldia ondo eramatea. Elkarri txanda noiznahi jatea ez da batere erosoa, ez norbere gozamenerako, ezta kalitaterako ere.

9) Entzuleak ez daude azkenaren zain, euren erreakzioa adierazteko. Iruditzen zaien edozein unetan egiten dute txalo eta uju.

10) Musikak lagundurik kantatzen dute, tresna nagusiak lautea eta gitarra direla.

11) Dezimaren neurria hamar lerro zortzi silabako da, baina lerroko azken hitzak azentu akutua daramanean, hots, azentua azken silaban kargatzen duenean, honek bi silaba balio du. Horrelako lerroak, beraz, zazpi silaba behar ditu.

12) Azkenik, Justo Vega eta Adolfo Alfonso hauek hirurogei bat urteko gizonak dira kaset honetan. Ez dira, beraz, Euskal Herrian azken urteotan indartu den belaunaldi gaztea bazalako baten adierazleak.

Iruzkin hauek aski direla uste dut, Kubar Puntuak eta gure Bertsolaritzak dauzkaten antzez eta desantzez jabetzeko. Lehen kolpean eta pixka bat kanpotik ikusita, dezimista hauek egiten dutena oso zail iruditzen zait. Hamar lerroak errimatu behar dituzte eta ez nolanahi, lau errima ezberdin konbinatuz baizik. Oinak honela parekatzen dira: 1-4-5, 2-3, 6-7-10, 8-9. Pentsa hamarreko txikia hamar lerroetan errimatu behar bagenu. Edo bederatzi puntukoaren lau puntu jarraiko tarte estu horrek nolako lanak ematen dituen. *Ikusten duzu goizean* neurria ere horrexegatik da zaila. Bertso bat edo bi bota daitezke, baina doinu horretan saio luzerik nekez inprobisatuko zen.

Dezimaren errima aldatzea bakarra eramatea baino errezago ez al da? Bai aldatu eta beste batean jarraitze soila balitz, Juana Bixentarenean bezala. Aldatu eta atzera berriz lehengora itzultzean daude lanak eta hori dezima barruan bi aldiz egiten dute. Hizkuntza bakoitzak bere ritmoa, bere jauziak eta bera kadentziak dauzka eta bakoitza bere hizkuntzaren senaren arabera trebatzen da. Ez dago, beraz, konparazio estuegirik egiterik. Hala ere, behar den guztia erlatibaturik ere, dezimista hauen lanari oso zail irizten jarraitzen dut. Euskaraz, aditz perifrastikoa eta gorago aipaturiko errimarako desabantailak direla bide, ez dakit hain espazio txikian horrela errimatzerik balegokeen ere.

# DOINUA

## DOINUAK ETA NEURRI MOTAK

Bertsolaritzan neurri mota asko dago. Doinuak berriz ehundaka. Neurri batzuk doinu ezberdin asko daukate, beste batzuk mordotxoa, batzuk hirulau bat, eta azkenik badaude doinu bakarreko neurriak ere.

Neurri mota asko esan dugu, baina zenbat da asko? Jo dezagun pare bat dozena eta ez gara urrun ibiliko. Horietatik, jakina, batzu oso erabiliak dira eta beste batzu oso bakan. Batzu bat-bateko bertsoetan gehiago entzuten dira eta beste batzu, zailagoak direlako edo, bertso jarrietan. Hona hemen neurririk erabilienak, hain ezagunak ez diren beste batzu ere sarturik.

ZORTZIKO HANDIA

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Bai | -etz | us | -te | -ko | de | -zu | -te | bai | -nan |
| ez | na | -go | o | -so | LA | -SAI | -A | | |
| Zal | -du | -ni | -o | -te | e | -gu | -ne | -ra | -ko |
| sar | -din | za | -rra | -ren | U | -SAI | -A | | |
| A | -ni | -ma | -ren | -tzat | me | -se | -de | -rik | ez |
| gor | -pu | -tza | -ren | -tzat | E | -TSAI | -A | | |
| ez | -ta | ho | -rre | -la | kos | -tun | -bra | -tu | -a |
| I | -zu | -e | -la | -ko | AR | -TZAI | -A. | (Izuela) | |

Lau puntu lerrobikoitz, hamar-zortzi silabako. Neurri honek ehundaka doinu dauka.

*HAMARREKO HANDIA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Mu | -til | kox | -kor | bat | i | -tsu | au | -rre | -ko |
| zu | -e | -la | AL | -DA | -ME | -NI | -AN | | |
| gi | -zon | bu | -ru | -soil | bi | -zar | zu | -ri | bat |
| bi | ma | -ku | -lu | -ren | GAI | -NI | -AN | | |
| ka | -le | er | -tzi | -an | i | -ku | -si | nu | -en |
| i | -no | -ra | e | -zin | JOA | -NI | -AN | | |
| ta | be | -ra | nor | zan | ja | -kin | nahi | -e | -an |
| in | -gu | -ra | -tu | NIN | -TZA | -NI | -AN | | |
| li | -mos | -na | -txo | bat | es | -ka | -tu | zi | -dan |
| Jain | -ku | -a | -ren | I | -ZE | -NI | -AN. | (Pello Mari Otaño) | |

Bost puntu lerrobikoitz, hamar-zortzi silabako.

*HIRU PUNTUKO HANDIA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Pe | -llo | Jo | -se | -pe | ta | -ber | -nan | de | -la |
| hau | -rra | jai | -o | da | LA | -RRAU | -NEN | | |
| E | -txe | -ra | joan | -da | e | -esan | o | -men | du |
| ez | -ta | ne | -re | -a | I | -ZA | -NEN | | |
| Be | -ra | -ren | a | -mak | to | -pa | de | -za | -la |
| haur | ho | -rrek | ai | -ta | zein | DU | -EN. | (Ezezaguna) | |

Hiru puntu lerrobikoitz, hamar-zortzi silabako. Iparragirreren *Ezkongaietan* ere neurri honetakoa da.

*ZORTZIKO TXIKIA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 |
|---|---|---|---|---|---|---|
| I | -tu | -ren | -go | ha | -ro | -tza |
| E | -rra | -mun | JO | -A | -KIN | |
| ha | -se | -rre | o | -men | zau | -de |
| ze | -ren | du | -gun | JA | -KIN | |
| san | -tu | -rik | ez | lai | -te | -ke |
| fi | -a | -tu | ZU | -RE | -KIN | |
| San | Kris | -to | -bal | ur | -tu | -ta |
| jo | -a | -ri | -ak | E | -GIN. | (Ezezaguna) |

Lau puntu lerrobikoitz, zazpi-sei silabako. Neurri honek ehundaka doinu dauka.

*HAMARREKO TXIKIA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 |
|---|---|---|---|---|---|---|
| A | -gur | a | -dis | -ki | -de | -a |
| Jain | -ko | -ak | E | -GU | -NON | |
| zer | be | -rri | den | e | -rra | -zu |
| zuk | o | -toi | XU | -BE | RON | |
| E | -za | -gu | tzen | du | -zi | -a |
| Bar | -ku | -xen | E | -TXE | -HUN? | |
| Ha | -la | -ko | ko | -bla | -ri | -rik |
| ez | o | -men | da | NE | -HON | |
| bi | -si | -taz | joan | nin | -dai | -te |
| ez | ba | -litz | hain | U | -RRUN. | (Bidarraiko Otxalde) |

Bost puntu lerrobikoitz, zazpi-sei silabako. *Esne saltzailearena* izeneko doinu hain ezagunaren neurria ere berau da, lehen puntuko bigarren lerroa errepikatuz. Errepikatu beharrean, maiz egiten denez, beste puntu bat sartzeari efektu bat izorratzea deritzot.

*HIRU PUNTUKO TXIKIA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 |
|---|---|---|---|---|---|---|
| Le | -nen | -go | -a | fe | -de | -a |
| ge | -ro | ES | -PE | -RAN | -TZA | |
| hi | -ru | -ga | -rre | -nak | ba | -du |
| mi | -la | bat | MU | -DAN | -TZA | |
| hil | da | ka | -ri | -da | -de | -a |
| bi | -zi | da | MEN | -GAN | -TZA. | (Izuela) |

Hiru puntu lerrobikoitz, zazpi-sei silabako.

*BEDERATZIKO LABURRA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 |
|---|---|---|---|---|---|---|
| San | -to | To | -mas | bez | -pe | -ran |
| e | -gin | -da | -ko | LA | -NA | |
| ez | -ta | di | -ru | -a | -re | -kin |
| pa | -ga | -tzen | DA | -NA | | |
| Ha | -la | -ku | -ak | jun | -ta | -tu |
| zi | -ran | AL | -KAR | -GA | -NA | |
| ha | -la | -re | ne | -ri | e | -man |
| za | -ba | -rra | -ren | FA | -MA | |
| ez | ne | -gon | E | -DA | -NA | |
| gus | -ta | -tzen | ZAI | -DA | -NA | |
| ho | -rrek | NE | -RE | -GA | -NA | |
| e | -zin | E | -RA | -MA | -NA | |
| on | -do | go | -gu | -an | har | -tu |
| e | -san | DE | -DA | -NA. | (Fermin Imazek Txirritari) | |

Bederatzi puntu. Lehen laurak zortziko txiki bat bezala, baina bigarren puntuko bigarren lerroak bost silaba dituela. Gero lau puntu lerrobakar jarraian, seina silabakoak, eta azken puntua zazpi-bostekoa. Neurri honetan bi doinu behintzat oso ezagun daude.

*AIZAK HI MUTIL*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Ai | -zak | hi | mu | -til | MAI | -NON | -TZI | | |
| na | -gu | -si | -a | -ri | GO | -RAIN | -TZI | | |
| ez | al | he | -ki | -ken | hor | pi | -pa'har | -tze | -a |
| e | -tze | -la | LI | -ZEN | -TZI? | | | | |
| Je | -ni | -o | txar | hoi | -ek | U | -TZI | | |
| bes | -te | -la | he | -zu | -rrak | HAU | -TSI | | |
| gi | -za | -le | -gi | -a | no | -la | be | -har | den |
| e | -zin | E | -RA | -KU | -TSI. | | (Xenpelar) | | |

Sei puntu. Lehen biak lerrobakarrak, zortzina silabakoak. Hirugarrena lerrobikoitza, hamar-seikoa. Hurrengo biak berriz lerrobakar zortzinakoak eta seigarrena hamar-seiko lerrobikoitza. Neurri honek badauzka hirulau doinu ezagun.

*IKUSTEN DUZU GOIZEAN*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| I | -kus | -ten | du | -zu | GOI | -ZE | -AN | | |
| ar | -gi | -a | has | -ten | DE | -NE | -AN | | |
| men | -di | -tto | ba | -ten | GAI | -NE | -AN | | |
| E | -txe | tti | -pi | -tto | ain | -tzin | xu | -ri | bat |
| lau | haitz | -on | -do | -ren | ER | -DI | -AN | | |
| xa | -kur | xu | -ri | bat | A | -TE | -AN | | |
| i | -tu | -rri | -ño | bat | AL | -DE | -AN | | |
| han | bi | -zi | naiz | ni | BA | -KE | -AN. | (Elizanburu) | |

Zazpi puntu. Lehen hirurak zortzina silabako lerrobakarrak. Berdin azken hirurak ere. Erdikoa lerrobikoitza, hamar-zortzikoa.

*IPARRAGIRREREN DOINUA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| I | -pa | -rra | -gi | -rre | a | -bi | -la | da | -la |
| as | -ko | -ri | di | -ot | A | -DI | -TZEN | | |
| es | -ko | -la | o | -na | e | -ta | mu | -si | -ka |
| ho | -ri | hoi | -e | -kin | ZER | -BI | -TZEN | | |
| Ni | ez | nau | -zu | I | -BIL | -TZEN | | | |
| kan | -tuz | di | -ru | -a | BIL | -TZEN | | | |
| ko | -me | -di | -an | -te | MO | -DU | -AN | | |
| de | -bal | -de | fes | -ta | pre | -pa | -ra | -tzen | det |
| go | -gu | -a | de | -dan | OR | -DU | AN. | (Xenpelar) | |

Doinu bakarra daukan neurri honi *Iparragirreren doinua* esaten zaio. Sei puntu dauzka, lehen laurak era batera errimaturik eta azken biak beste batera errimaturik. Lehen bi puntuak zortziko handiaren erdia bezala dira. Gero bi puntu lerrobakar jarraian, zazpina silabaz. Bosgarrena lerrobakarra, baina zortzi silabaz eta errima aldatuz eta azken puntua lerrobikoitza, hamar-zortzikoa. Errima aldatzea erdiko bietan egitea ere badago, bosgarrenean berriz lehengora itzuliz. Era hau ohikoago da gaur egun.

*IA GURIAK EGIN DU*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| I | -a | gu | -ri | -ak | E | -GIN | DU | |
| ba | -de | -gu | zei | -nek | A | -GIN | -DU | |
| Ez | o | -rain | -dik | U | -MIL | -DU | | |
| al | -ka | -rren | -ga | -na | BIL | -DU | | |
| ge | -rra | nahi | du | -en | GU | -ZI | -A | |
| be | -ra | -ri | ken | -du | BI | -ZI | -A. | (Xenpelar) |

Sei puntu, denak lerrobakarrak, lehen lau oinak batera eta azken biak bestera errimatuz. Hirugarren eta laugarren puntuek zazpina silaba. Besteek zortzina. Neurri honek bere doinua dauka, oso ezaguna.

*ZORTZIKO ZAHARRA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Txo | -ri | -txo | -en | des | -ti | -no | -ak |
| jar | -tzen | nau | A | -TSE | -KA | -BEZ | |
| kan | -ta | -ri | -rik | po | -li | -te | -nak |
| kai | -o | -lan | sar | -tzen | DA | -BEZ | |
| Eus | -kal | -du | -nok | li | -bre | bi | -zi |
| nahi | do | -gu | txo | -ri | -ak | LEZ | |
| kan | -ta | -tze | -a | mai | -te | do | -gu |
| bai | -na | kai | -o | -la | -rik | EZ. | (Amuriza) |

Lau puntu lerrobikoitz, zortzi-zazpiko. Neurri honek doinu ezagun bat dauka, askotan zortziko handira egokiturik kantatzen baina. *Adios ene maitea* ere neurri honetakoa da.

*URZO XURIA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Ur | -zo | xu | -ri | -a | E | -RRA | -ZU | | |
| no | -rat | jo | -ai | -ten | ZI | -RA | ZU | | |
| Es | -pai | -ni | -a | -ko | men | -di | guz | -ti | -ak |
| e | -lu | -rrez | xu | DI | -TU | -ZU | | | |
| gaur | gau | -e | -ra | -ko | zu | -re'os | -ta | -tu | -a |
| e | -ne | e | -txe | -an | DU | -KE | -ZU. | (Ezezaguna) | |

Doinu hain ezagun honen neurriak lau puntu dauzka, lehen biak lerrobakar zortzi silabakoak eta beste biak hamar-zortziko lerrobikoitzak.

*MEHETEGIKO XAKURRA*

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Me | -he | -te | -gi | -ko | XA | -KU | -RRA | |
| zan | -goz | e | -rai | -nez | MA | -KU | -RRA | |
| ber | -ga | bat | lu | -ze | MU | -TU | -RRA | |
| la | -rru | -tik | hur | -bil | HE | -ZU | -RRA | |
| ur | -te | gu | -zi | -a | BA | -RU | -RRA | |
| ze | -ren | den | to | -ki | XU | -HU | -RRA. | (Otxalde eta Zaldubi) |

Sei puntu lerrobakar, zortzina silabako. Neurri honen doinu bakarra ezagutzen dut.

Gure helburua ez da neurri guztiak ematea. Are gutxiago doinu guztiak. Horretarako beste liburu lodi bat beharko genuke, aurretik bilketa luzea eta lantsua eskatuko lukeena. Zorionez lan hori egina dago, Joanito Dorronsororen *Bertso Doinutegia* izeneko urteetako lan eskergan. Doinuen interes berezia daukanak orain badauka nora jo.

Neurriei buruz, erabilienak eta ezagunenak eman ditugu, bai bat-bateko bertsoetan, bai jarrietan. Badaude beste neurri batzu ere, bertso sortaren batean edo bestean erabiliak. Neuk ere badaukat zenbait neurri eta doinu berri, baina hau ez da horiek azaltzeko lekua. Har kontuan neurri jakin bati doinu berria asma dakiokeela, baina neurria berria bada, nahitaez doinuak ere berria beharko du.

Doinu batzuk kanta egitura gehiago daukate, nahizta hitzak agian bertso tankerakoak izan. Hala, esaterako, *Maitia nun zira, Maite bat maitatzen dut, Ezkongaietan* eta abar. Hemen aipaturiko neurririk erabilienak, bai bat-batean, bai jarrietan, zortziko handi-txikiak dira. Gero gutxiago, baina asko, hamarreko handi-txikiak. Hauez gainera, bertso jarrietan bederatziko laburra oso erabilia izan da. *Esne saltzailearena, Urzo xuria, Iparragirrerena* eta *Aizak hi mutil* gero eta gehiago entzuten dira aspaldion. Hiru puntuko handi-txikiak apenas inoiz entzuten diren plazan, lastima da baina. *Ia guriak egin du* eta *Mehetegiko xakurra* ere nekez entzungo dira, bertso jarrietan edo bat-batean testimonialki ez bada.

## ETENA

Etena geldiune edo pausa musikal bat da, testuak ere errespetatu behar duena. Zubi hori ez dago hitz berarekin pasatzerik, aurreko hitza bukatu eta ondoren beste bat hasita baizik. Ikus dezagun zortziko handian. Neurri honetan lau puntu lerrobikoitz daude, hamar-zortzi silabako.

| | | | | | | | | | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| | | 5 | | | | | 5 | | |
| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | | |

Lehen lerroko hamar silabak bi boskote dira. Bosnaka joan behar dute, musikak erdian pausa bat egiten duelako. Ez dago hitz bera hautsita jauzi egiterik. Ezin da honela egin:

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| He | -men | -dik | da | -to | -zen | on | -do | -re | -nak |

*Datozen* hitza etenean hautsirik geratzen da. Horixe da etena ez errespetatzea. Honela egin beharko litzake:

| 1 | 2 | 3 | 4 | 5 | 6 | 7 | 8 | 9 | 10 |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| He | -men | -dik | da | -tor | on | -do | -ri | -o | -a |

Kasu honetan *dator* hitza bosgarren silaban amaitu egiten da. Gero beste boskotea dator. Hona Txirritaren bertso bat:

Esplikatzera noa kontuak
ijitu jende hoienak
nola diraden gure artean
gertatu izan direnak.
Alperrak edo mozkorrak dira
erdi lapurrak gehienak
okasiua ta eskandalua
faltatzen etzaietenak.

Begira nola lerro luzeak, hamar silabakoak, bosnaka doazen. Horrek ez du esan nahi bost silabako hitzak izan behar dutenik, bosgarren silabatik seigarrenera ez dela hitzik hautsi behar baizik. Zortziko zaharrean ere etena egin beharko litzake, zortzi silabako lerroa bi laukotetan eramanez:

Hegoatik Iparrera
haizearen gudari
hegan nator eta badut
zer kantatu ugari. Eta abar.

Zortziko handian badaude doinu batzu, zortzi silabako lerroan ere etena iradokitzen dutenak. Honela:

Goizean jaiki ohetik eta
ireki nuen atea
pentsatu nuen egunsentiko
argitasuna jatea.

Puntu bakoitzaren bigarren lerroko eten hori, eginez gero, polita da doinu batzutan, baina ez dago inola ere arautzat hartzerik. Orduan hiru silabatik gorako hitzik ezingo genuke sekula errimatzat sartu. Etenaren kontu hau, beraz, zortziko handiaren eta zortziko zaharraren egitura daukaten neurrietarako eta puntuaren lehen lerrorako bakarrik da. Egitura horretakoak dira hamarreko handia, Iparragirrerenaren lehen erdia eta azken puntua, Urzo xuriaren bigarren partea eta abar. Zortziko txikian eta antzeko egitura daukatenetan ez dago arau horren loturarik, bestela ere nahiko laburrak baitira.

Zertan dago etenaren oinarria? Doinuak berak egiten duen etena da. Kanta itzazu zortziko handi batzu eta ikusiko duzu nola doinuak berak daraman etena edo geldiunea, esaniko une horietan. Beraz, musikaren ritmoak eskatzen duena dela esan genezake.

Baina kontuz. Doinu guztiek ez daramate ritmo berdina. Askok egitura hori daukate, baina badaude hamar silabako lerroa honela banatzen dutenak: 3-3-4. Beraz, hamar silaba, baina banakuntza ezberdina. Gainera doinuek une horretaz beste batzutan ere badituzte eten musikalak. Guzti horiek errespetatzea ezinezkoa litzake.

Ari garen kasuon, eten musikala gehien eta nabarien gertatzen den tokian, testua ere eteteko ohitura nagusitu da. Ohitura hori pixkanaka arau bihurtu da eta arau bihurtu den tokietan belarriak badirudi horixe eskatzen duela. Baina bilakaera hau ez da denean berdin izan. Iparraldeko tradizioan etenari ez zaio garrantzi gehiegi eman. Hango belarriei ez datorkie hain gaizki etenaren araurik gabeko bertsoa.

Eten kontu hau, beraz, nahiko erlatiboa eta konbentzionala da jatorriz. Horrek ez du esan nahi garrantzirik ez daukanik, arte-arauak horrelaxe sortzen eta aldatzen baitira. Gaur arau hori errespetatu beharra dagoela esan dezakegu, tarteka salbuespen bat edo beste egitea huts handia izango ez bada ere. Baina gehienean etenik egiten ez jakitea huts handitzat jo behar da.

## NOLAKO DOINUA

Bertsolaritzan doinuaren eginkizuna hitza eramatea da. Bertsogintza zerbait kantuz esatea da eta egintza horrek osotasun bat dauka, osotasun banagaitza. Orain arte behintzat ez dago kantatu gabe bertsotan egiterik. Hala ere bi osagai horietan, doinua eta hitza, bertsolaritzan garrantzirik gehien daukana hitza da. Zer esaten den garrantzitsuago da, nola kantatzen edo nolako doinua erabiltzen den baino.

Hauek honela, doinuak musikaz bigarrentasun hori zaindu behar du. Horrek esan nahi du musika ez dela nahasiegia izango, ez dela bera nagusituko. Nola nagusi liteke musika? Ba, kantu, opera edo horrelako zerbait bihurtuz. Orduan musika bera da behinena eta hitza bigarren mailakoa. Musikak goi-behe handiak, jauzi bortitzak, ritmo zailak, gurutzatuak, edozer erabil dezake.

Bertsolaritzan, ordea, musika hitzaren eramale denez gero, doinuak ez dira konplikatuak izango, errezitakor samarrak baizik. Doinu zaharrik gehienak eskala zati txiki baten barruan, nota musikal gutxiren tartean moldatzen dira, alegia, boza ez da asko igoten edo jaisten. Oktaba bat *–do-re-mi-fa-sol-la-si-do–* hartzen badugu, bertso doinurik gehienen zatirik handiena oktaba erdiren barruan dabil, notaren batzu edo erdiko bariazioren bat gorago edo beherago saltatzen dela.

Badaude doinuak –neuk ere badauzkat batzu– tarte hori gehiago zabaltzen edo eskala zati handiagoa hartzen dutenak. Orduan ia-ia kanta bihurtzen dira. Euskal kanta asko horrelakoak dira. Horietan zer da garrantzitsuago, musika ala hitza? Hona zenbait adibide: *Maitia nun zira, Goizean goizik, Ikusten duzu goizean, Oilarra kukurruka, Xori errusinola* eta abar. Hauetan musika oso nortsua da. Eta hitza? Muga zehatzik jartzerik ez dago, baina bai globalki bereiz daitezke doinu errezitakor samarrak eta kanta airekoak. Dena dela, hauen testuak ere gehienean bertsoak dira. Batzuk kantatzat kantatu badituzte, beste batzuk bertsotzat egin dituzte. Bertsolari tradizioan ere bertsoak kanta doinuz ematea normala izan da.

Hauek honela, bertso doinu konplikatuagoak edo, nolabait esateko, musikalagoak ere ondo hartzen ditu bertsozaleak. Horrelako doinuak gaur gehiago erabiltzen dira, bai doinu berriak, bai kanta doinuak, bertsotarako erabiliak.

Baina badago hor pasa ez daitekeen muga bat. Ez da noski muga zehatza, tarte eztabaidagarria eta zabal samarra baizik. Baina badago muga bat. Bertso doinuen tankerak muga horren azpitik egon behar du. Handik gora konposizio musikala edo zernahi izango da, baina ez, bertsolaritzak eskatzen duenez, testuaren laguntzaile izatekoa. Horrek ez du esan nahi bertso doinua musika ez denik. Musika bikaina izan daiteke. Baina bere tankera daukana. Musika mota bat.

Atal hau amaitzeko, askok egiten duen galderari erantzungo diogu: *Zer musika behar da bertsolari izateko? Ondo kantatzea garrantzitsua al da?* Musika aldetik, bertsolaritzak ez dauka eskabide handiegirik. Belarri edo entzumen normala daukan edo, nork aisa kanta ditzake bertso doinuak. Aski da belarri txarrik ez edukitzea. Edo, beste era batera esanda, belarri benetan txarra eduki behar da, bertso doinuak ez menperatzeko. Horrelakoak ere badaude banaka batzu eta horiek gaizki ibiliko dira.

Hortik aurrera abots hobea edukitzeak edo hobeto kantatzeak bere balioa edukiko du, baina ez da funtsezkoa. Opera batean ondo kantatzetik hobeto kantatzera alde handia egon daiteke. Bertsolaritzan ondo kantatzea normal kantatzea da, hots, belarri edo abots normaleko edonork egin dezakeena. Hortik gora hobetotxoago kantatzeak edo abots hobetxoa edukitzeak gehiago luzituko du. Baina gaur alde horretatik ez dago kezkatu beharrik. *Gaur* diot, lehen ez baitzen horrela. Orain gehienean mikrofonoak eta bozgorailuak daude eta abots makala daukatenek ere trumoi hotsa atera dezakete. Lehenago abots indartsua edukitzeak garrantzi handia zeukan. Indartsua eta

iraunkorra. Plaza irekian hala kantatzeko, eztarri ona behar zen. Alde horretatik aurrerapenak zerbait onik ekarri digu.

## DOINUA NEURTZAILE

Aurreko atalean doinua hitzaren laguntzaile dela esan dugu. Eta ez hitza eramateko bakarrik, neurtzeko ere baizik. Bertsolarien lanik zailenetarikoa neurtzea da. Ez dago esaldiak nolanahi luze-laburtzerik, neurri juxtuan sartu baizik. Neurri bakoitzak hainbeste silaba dauzka eta haiexek kantatu behar dira, ez bat gehiago ez gutxiago. Nola egiten da hori? Silabak kontatuz edo hatzez kontua eramanez? Ez noski. Doinuak berak laguntzen du horretan, behin trebetasun apur bat lortutakoan. Doinua trenbidea bezalatsu da. Errailek eurek daramate trena eta berez-berez daramatela dirudi, baina trena deserrailtzen bada, hura burdin-hotsa aterako duena.

Trenak nahiko errez egiten duen hori bertsolariarentzat ez da hain sinplea. Doinuak laguntzen du, baina bai estutu eta behartu ere. Zergatik hori? Euskal kantetan eta bertsolaritzan batipat, musikak badauka berezitasun bat: nota bakoitzari silaba bat dagokio. Beraz, honenbeste nota daukan doinuak honenbeste silaba behar ditu. Orduan ez da erreza tranparik egitea eta, egiten baldin bada, disimuluan pasatzea, nahizta batzuk disimulatzen ere artistak diren.

Nota musikal bakoitzari silaba bat egokitzea arau orokorra da, zeinak ez duen esan nahi salbuespenik ez dagoenik. Badaude doinuak tarteka silaba bakarrez bi nota musikal hartzen dituztenak. *Urzo xuria* honela hasten da:

Urzo xuria errazu
norat joaiten zira zu.

Kantaerarik gehienetan bigarren lerroko *norat* horren lehen silabak bi nota hartzen ditu, **no-o-rat** eginez. Nota arrastatua bezala. Pasoko nota hori kendurik ere, doinuak ez luke ezer galduko, baina apaingarri bat da. Doinuak horrelako aukera ematen duenean, silaba baten gorabehera disimulatzea errezago da, baina bertso doinurik gehienek ez dute horretarako erarik ematen.

Doinua laguntzaile dela esatean, neur-senak landurik egon behar du. Gaizki neurtzen duenarentzat, doinua etengabeko kontrastea da eta alde horretatik neurtzen ikasten lagunduko dio. Behin neur-sena edo doinu barruan joatea menperatutakoan, orduan doinua laguntzaile handia da. Berak darama hitza, erretenak ura bezala. Horrek ez du esan nahi berezkoa denik, aurretik kostatua baizik, eta gainera sekula guztiz menperatzen ez den mekanismoa da. Bertsolaririk trebeenak ere neurrian ernai ibili behar du beti, noiznahi baitago huts arriskua.

# ERRIMA

## HOTSEN KIDETASUNA

Errima hotsen kidetasun edo hoskidetasunean oinarritzen da. Arau hori sakon eta zabal ulertzea da hiztegi errimatuaren oinarri nagusia. Hotsen kidetasuna diogu, ez berdintasuna. Hizki berdinek hotsa ere berdina behar dutela argi dago. Adibidez, *belarra-zilarra*. Bi hitzon azken bi silabak kideak ez ezik, berdinak dira: *be-LARRA, zi-LARRA*. Kidetasuna askoz zabalagoa da eta mila bider aukera gehiago ematen du. Hots berdinez baliatzekotan, bide laburra eta urria genuke.

Bertsolaritzan badaude kidetasunaz baliatzen diren kasuak. Esaterako, TS-TZ, S-Z, M-N... elkarrekin nahastea ohitura arrunt bilakatu da. Inoiz gehiago ere bai. Xenpelarren bertso batek honela dio:

Ni ez naiz gerraren zale
baizik pakearen alde.
Zeinek nahi duen galde
berari tira dale
bala bat sartu buruan
aspertuko da orduan.

Lehen lau oinek berdintasun irizpidez errima gaiztoa irudi dezakete. Kidetasunetik joez gero, ordea, oso errima ona egiten dute, batez ere binaka doazelarik: *alde-galde, zale-dale*. Hala ere, bertsolaritzan kidetasunari ez zaio hainbeste etekin atera. Berdintasunetik gehiago ibili da. Lan honen oinarria kidetasunaren ataria osoki zabaltzea da. Has gaiten horretarako letrak sailkatuz edo familiak eginez.

## KONTSONANTE FAMILIAK

Kontsonanteetan badaude bigunak, sendoak eta oso sendoak. Batzu ahaide edo kide dira eta beste batzu bakar edo kidegabe. Hona familiak:

1) B-D-G-R. (Hau biguna).
2) K-P-T.
3) S-Z-X.
4) TS-TZ-TX.
5) M-N.
6) F-J-H.
Bakarrak: RR, L, LL, Ñ.

L eta LL ezberdintzat jotzen ditugu, bertsolaritzaren tradizioan ez baitira nahasi. Berez, kidetasuna argi dago, LL elearen bustidura besterik ez baita. Baita erre bigunaren ere. Horrela *bello belo* nahiz *bero*-ren txikigarria izan daiteke. Erre biguna eta elea ere nahiko kide dira, beraz. Familiren batetan sartzekotan, L-LL lehenengoan sartu beharko genituen.

Ñ ere, enearen bustidura izanik, bosgarren familiko kidetzat jo zitekeen, baina tradizioak aparte erabili ditu. RR edo erre sendoa izan liteke duda gabe bakarrik joatekoa, oso hots indartsua izanik, ez baitauka kide hurbilik.

Lehen taldekoak (erre biguna ezik) eta bigarrenekoak elkarrekikoak edo korrelatiboak dira, batzuak bigunean, besteak sendoan. B sendotua P da, D sendotua T eta G sendotua K: *ez da-ezta, ez gara-ezkara, ibil bide-ibilpide*. Gauza bera gertatzen da hirugarren eta laugarren taldeekin ere: S-TS, Z-TZ, X-TX. Hemen ez dago bigunetik sendora esaterik, sendotik sendoagora baizik, S-Z-X oso hots indartsuak baitira. Adibidez: *pensatu-pentsatu, ez zuen-etzuen, xoria-txoria*. TX hau TS eta TZ-ren bustidura ere bada: *saltsa-saltxa, altzatu-altxatu*.

M-N ere kideak dira, baina M inoiz ez da hitzaren amaiera, hitz arrotzetan edo mailebuetan ezik: *Sam, album* eta abar. N ordea noiznahi dago hitz amaieran: *nuen, lan, egon, bidean* eta abar.

Seigarren sailekoek, hoskideak eta nortasuntsuak izanik, ez daukate hainbeste garrantzi, aplikazio gutxikoak baitira. F euskal letra izanik, ez da ugaria. H lekurik gehienetan ez da aspiratzen. J ugariagoa da, baina gaztelaniazko hitzetan: *ajea, potajea, korajea, salbajea* eta abar. Euskal hitzetan ere badago letra hori: *joan, jo, Jainkoa, jauna* eta abar, baina jotaren gaztelaniazko ahozkapena ez da toki guztietakoa. Ezta gomendagarriena ere.

Sailkapena egin ondoren, zer indar edo nortasun emango diogu bakoitzari? Orain beste sailkapen bat egitera goaz eta hemen kide ez direnek ere puntuazio berdinean sartzea gerta daiteke.

1) Bigunak: B-D-G-R.
2) Sendoak: K-P-T, L-LL, Ñ, M-N.
3) Oso sendoak: S-Z-X, F-J-H, RR.
4) Sendoenak: TS-TZ-TX.

Sailkapen hau nahiko subjektiboa da, baina ez dugu huts handirik egingo, honela emanik. Hemen kontsonante bakoitzaren indarra edo nortasuna neurtu nahian gabiltza. Bigarren sailean oso hots ezberdinak batera jarri ditugu, baina nortasunean paretsu jarririk. Hirugarrenean ere bi hirukoteak eta RR oso ezberdinak dira, baina nortasun berdintsua damaiegu. Indar ezberdintasun hau zenbakiz adieraztekotan, puntuazio hauxe emango genieke:

1) Bigunak: 2.
2) Sendoak: 3.
3) Oso sendoak: 4.
4) Sendoenak: 5

Bi puntutik hasten gara, bestela, batetik hasita, proportzioan jauzi handiegia bailegoke: 1-etik 4-ra. Beraz, sendoenak bigunenak baino lau bider indartsuago. Hori alde handiegia da. 2-tik 5-era bi bider eta zerbait gehiago da. Proportzio zuzenagoa dirudi. Zenbakiok orientatibo soilak dira noski, baina neurtzeko argienak.

## BOKALAK

Bokalak bost dira: A, E, I, O, U. Badakigu ahozkatzean bost baino gehiago ere badirela, euskalkitik euskalkira eta tokitik tokira aldea baitago. Baina ahalbide guztiak bost hauen inguruan dabiltza eta lan honetan ohizko bost bokalekin jokatuko dugu.

Bokaletan ez dugu familirik egingo, gutxi izanik, banaka begiratzea hobe baita. Nolanahi ere, bi familia egitekotan, I eta besteak esango genuke. Hiru egitekotan, A-E, O-U eta I. Beraz, I da bereziena. Lan honetan ez dugu bokalen kidetasun posibleaz jokatzen, bokalak bakarka harturik baizik.

Puntuaziorik ematekotan, zenbana eman bokalei? Zenbat indar edo nortasun izendatu bakoitzari? Hiruna puntu emango diegu. Denei berdin. Beraz, kontsonanteen sailkapenean, sendoekin parekatuko genituzke, bigarren sailean. Orain koadru osoa honela geratzen zaigu:

2 puntu: B-D-G-R.
3 puntu: A-E-I-O-U, K-P-T, M-N, L, LL, Ñ.
4 puntu: RR, S-Z-X, F-J-H.
5 puntu: TS, TZ, TX.

Sailkapen puntuatu hau gogotan hartzea ondo datorke, hurren esango duguna ulertzeko. Hain zuzen hiztegi errimatuaren oinarri eta etekin nagusia hortxe dago. Alde batetik letrak hoskidetasun edo elkarren antzetik sailkatzeak errimaren eremua neurri gabe zabaltzen du. Bestetik letra bakoitzaren puntuazioak gero argibide handia emango digu, errimakera arina eta sendoa bereizteko. Goazen bi puntuoz aritzera.

## KONTSONANTE KIDEAK ELKARREKIN

Kontsonante kideak elkarrekin sartzeak edo errima beraren barruan kontsideratzeak ahalbideak asko bidertzen ditu. Berdinak ez direnez gero, alde horrek puntuazio orokorrari zerbait kenduko dio, baina beste berdintasun edo kidetasun batzurekin konbinatuz gero, alde hori sobera gainditurik geratzen da.

Esaterako, hona hiru silaba: BA-DA-GA. Hirurek bokal bera daukate. Kontsonanteak ez dira berdinak. Beraz, alde horrena zerbait kendu beharko da. Baina aurretik beste letra batzurekin indarturik badator, errima on bilakatzen da. Adibidez: *gaba-bada-baga*. Aurreko bokala ere A dute. Eta gainera bokal horrekin datozen kontsonanteak ere, G eta B, berriro elkarren kide dira. Beraz, errima ona egiten dute.

Kontsonante bakoitzari zerbaitegatik eman diogu puntuazio ezberdina. Horrek esan nahi du kontsonante bigunak aurretik laguntzaren behartuago daudela. Zenbat eta makalago izan, errima ona egiteko, beste letra batzuren laguntza handiagoa behar. Kontsonanterik sendoenek laguntza behar gutxien daukate, berez ere nortasun handikoak baitira. Horrela TSA-TZA-TXA silabek, esaterako, beste gabe ere errima ona egiten dute. Horrek ez du esan nahi hauek ere, aurretik zerbait gehiago dutela, hobeak ez direnik. Esaterako, *hatsa-hotsa-hautsa-hutsa* errima onak dira, baina hobeak *hatsa-gatza-latza-satsa*. Hiztegi errimatua kontsonante familietatik egina dago, bakarrak edo familigabeak ez direnean. Eta beti aurreko silabako bokalak edo kontsonanteak kontuan edukirik. Horrek ematen die osotasuna azken silaba kontsonante kidez daramaten errimei. Kidetasunari barik berdintasunari segitu nahi dionak hantxe edukiko ditu familia bakoitzeko kontsonante bakoitzari dagozkion hitzak. Arau orokor bat ematekotan, honela bil genezake esaten ari garena:

1) Kontsonante bigunek edo bi puntu dauzkatenek aurreko laguntza beharrezko dute. Eurek bakarrik errima arinegia egiten dute, batez ere elkarrekin nahasten badira.

2) Sendoek edo hiru puntukoek aurreko laguntza ez dute hain beharrezko, baina bai komenizko.

3) Hirugarren sailekoek edo lau puntuko kontsonanteek aurreko laguntza gabe ere ontzat jo daitezke.

4) Laugarren sailekoek edo bost puntukoek laguntzarik gutxien behar dute. Aurreko laguntzarik ez dute behar.

Hemen, jakina, minimoa esaten ari gara, ontzat jotzeko gutxienez behar dena. Hortik gora, beharrik ez daukanari ere aurreko silaba indartzen bazaio, errima ondu egingo da.

## ERRIMAREN NEURRIA

Errimaren neurriak, kontraesana badirudi ere, bere funtsa dauka. Errima ere neurgarri baita. Horrexegatik eman diogu arestian letra bakoitzari bere

balioaren zenbakia. Zenbaki hori elkarrekin konparatzeko modu bat besterik ez zen, baina tresna ona eta argia, errima neurtzeko edo errima arin-sendoak bereizteko. Horretara goaz orain.

Hiztegi Errimatua azken bi silabak kontuan harturik egina dago. Azken silaba bakarrik gutxiegi da eta azken bi silaba baino gehiago eskatzea gehiegi. Beraz, oro har, bi silabari begira gaude. Adibidez, *guraso, onena, harrigarri* hitzetan azken bi silabak *–raso, –nena, –garri* dira. Badaude bi silabako hitzak. Orduan hitz osoa hartzen da, esaterako, *jaso, gabe, hori...* Badaude azkenik silaba bakarrekoak ere. Orduan hitz hau eta aurreko hitzaren azkenengoa hartzen dira, esaterako, *hola da, eman dik, nago ni*. Hauetan *–la da, –man dik, –go ni* hartzen dira.

Oker ulertzerik izan ez dadin, hiztegia honela egina dagoela esaten ari gara eta, oro har, sistema hau bere neurrian dela balioko. Badaude anitz kasu, silaba bakarrez errima oso ona egiten dutenak eta beste batzu, azken silaba birekin ere arin gertatzen direnak. Hurrengo atalean azalduko dugu hau.

Orain dagokigun harira jorik, silaba bakoitzak bi edo hiru letra eduki ditzake, hiru ahalbide emanez: kontsonantea gehi bokala: SA, BA, LE. Bokala gehi kontsonantea: AL, EZ, UR. Kontsonantea gehi bokala gehi kontsonantea: SAL, GUR, GATZ. Badaude laukoak eta inoiz bostekoak ere: BRUZ (deabruz}, BLEZ (doblez). Hauetan bi kontsonante gehi bokala gehi kontsonantea dira. Bokal ordez diptongoa daramatenean, laukotea maiz gertatzen da: GAUR, MAIZ, NAIZ, RAIZ (garaiz) eta abar. Bostekoak: PRAIZ (apraiz) eta abar. Hauek ez dira asko. Dozenerdi topatzen lanak leudeke. Bi kontsonantez amaitzen diren kasuak ere badira: KOSK, BOST, NORK, BORT, NEHORK. Hauek ere ez dira asko. Bokalaren aurretik eta atzetik bina kontsonante egotea ere baliteke: KRASK, BLAST. Oso kasu gutxi. Azkenik, bokala izan beharrean, diptongoa bada, sei letra ere sar daitezke silaba bakarrean: GRAUSK, PLAUST. Dozena bat topatzen dituenari saria.

Kasu guztiok aipatu ondoren, itzul gaitezen lehenera. Silaba batek letra bat, bi edo hiru edukitzea jotzen dugu. Diptongoekin lau letra maiz gertatzen badira ere, hobe dugu horiek aparte ikustea, oso nortasun berezia baitaukate. Beraz, silaba bakoitzari letra bana, bina edo hiruna emanik, eta azken bi silabak harturik, hamalau kasu gertatzen dira:

1) BE-GI: kontsonantea-bokala gehi kontsonantea-bokala.
2) BI-EZ: kontsonantea-bokala gehi bokala-kontsonantea. Kasu hau diptongo hautsiekin bakarrik gerta daiteke.
3) BE-GIZ: kontsonantea-bokala gehi kontsonantea-bokala-kontsonantea.
4) AL-BA: bokala-kontsonantea gehi kontsonantea-bokala.
5) AL-BAZ: bokala-kontsonantea gehi kontsonantea-bokala-kontsonantea.
6) GAL-DE: kontsonantea-bokala-kontsonantea gehi kontsonantea-bokala.
7) GAL-DEZ: kontsonantea-bokala-kontsonantea gehi kontsonantea-bokala-kontsonantea.
8) A-LE: bokala gehi kontsonantea-bokala.

9) A-LEZ: bokala gehi kontsonantea-bokala-kontsonantea.
10) BI-A: kontsonantea-bokala gehi bokala.
11) DEI-A: kontsonantea-diptongoa (ai, ei, oi, ui, au, eu, ou) gehi bokala.
12) DEI-EZ: kontsonantea-diptongoa gehi bokala-kontsonantea.
13) DEI-KA: kontsonantea-diptongoa gehi kontsonantea-bokala.
14) DEI-RIK: kontsonantea-diptongoa gehi kontsonantea-bokala-kontsonantea.

Egon daitezkeen beste kasuak ez dira garrantzi handikoak izango. Goazen orain puntuaziora. Lehen kasuan bi silabak kontsonantea-bokala gehi kontsonantea-bokala ziren. Har ditzagun hitz hauek: *Bada, gaba, baba, gara.*

2 3 2 3 = 10
B A D A
2 3 2 3 = 10
G A B A
2 3 2 3 = 10
B A B A
2 3 2 3 = 10
G A R A

Batez beste: 10 X 4 : 4 = 10 ken 2 = 8.

Zergatik kentzen ditugu bi puntu? Kontsonante berdinak ez izatearen diferentzia da hori. Kideak dira, baina nahasten direnean, bakoitzari puntu bana kendu beharra dago diferentzia horregatik. Norbaitek galde lezake ea zergatik kentzen dugun puntu bana, kontsonante kideak diren bakoitzean. Ez al ditugu, ba, familia berean sartu? Ezer ez kentzeko, berdinak izan beharko lukete. Kideen deskontua puntu bat bakarrik da. Esatera, B eta T nahasten badira, orduan bi puntu kendu behar, T-ek hiru puntu eta B-ek bi balio baitu. Beraz, puntu horren aldea kendu behar da eta gainera kontsonante ezberdinak nahastearen beste bat. T ordez S bada, hiru puntu kendu behar, S-ek lau puntu balio baitu. Eta TS bada, lau puntu kentzeko, kontsonante honek bost balio baitu. Hona adibide batzu:

2 3 3 3 = 11
B A L A
2 3 2 3 = 10
B A B A

Batez beste: 10,50 ken 2 = 8,50.

Hemen L-B kontsonanteak konbinatzen dira. Bi puntu kentzea dagokio.

2 3 3 3 = 11
B E T A
4 3 4 3 3 = 17
F E S T A

Batez beste 14 ken 7 = 7.

Ikusten denez, hitz batetik bestera alde handia dago hemen. Zazpi puntu kendu behar dira B-F bikotearen diferentziari hiru puntu dagozkio. Gero bigarren hitzean S bat ageri da, lehenengoan ageri ez dena. Beraz, S horrek balio dituen lau puntuak kendu behar dira. Guztira, zazpi kentzeko.

Zergatik batezbeste hori? Bata-besteen erlazioa delako. Hamaika puntukoari zazpi kendurik, lau bakarrik geratzen dira. Baina lau bakarrik balio izateko bezain errima txarrak ez dira. Hamazortzikoari zazpi kendurik, ordea, hamaika geratzen dira. Hainbeste balio izateko bezain errima onak ere ez dira. Zer egin? Bien batezbestekoari kendu. 11 + 17 = 28. Honen erdia, biren artean banatu behar baita, 14. Eta honi 7 kendurik, 7 geratzen da. Horixe da *beta-festa* hitzek elkarrekin daukaten errimaren puntuazioa.

Aproba hauek gorago aipatu hamalau kasuekin egin daitezke. Horrez gainera, kasu bakoitzean bost bokalez eta hainbeste kontsonantez joka daitekeenez gero, konbinapen posible guztiak egin litezke. Har dezagun adibide luze bat, bi silabarik bakoitzak hiruna letra dauzkana.

2 3 4 3 3 4 = 19
B A Z T E R
3 3 4 3 3 4 = 20
L A S T E R

Batezbestea: 19,50 ken 3 = 16,50.

Hemen hiru puntu kendu behar dira, bi B-L bikotearen diferentzia eta bat S-Z bikotearena. Hemeretzi eta hogeiren batezbestea 19,50 da. Honi hiru kendurik, 16,50 geratzen da. Oso puntuazio altua noski.

Beste gako bat orain. Kontatze horretan noraino heldu behar da? Hitza edo hitzak atzetik aurrerantz harturik, non amaitzen da errima edo non esan dezakegu nahikoa dela? *Bazter-laster* hitzekin, atzetik aurrera, letra bakarra hartzetik seirak hartzera mailaketa hau dago: R-ER-TER-ZTER-AZTER-BAZTER. Beste hitzarekin: R-ER-TER-STER-ASTER-LASTER. Dudarik gabe, R gutxiegi da errimarako. ER ez hain gutxi, zazpi puntu osatzen baititu. TER ona hamar punturekin. ZTER-STER oso ona hamairurekin, hamalauri bat kendurik S-Z-ren diferentziarena. AZTER-ASTER are hobea hamaseirekin. Eta hitz osoak harturik, hamasei eta erdi, lehen atera dugunez.

Noraino heldu behar da neurketa honetan? Gutxienez minimo bat lortu arte. Hortik gora goiak libre daude, puntuazioan igoteko. Hemen minimoaren neurria bilatzen ari gara. Zein da minimo hori? Gutxienez sei puntu. Zorrotzago harturik, zazpi. Hortik behera ez da minimora heltzen. Beraz, bost puntukoa edo gutxiagokoa errima arintzat edo txartzat jo behar da. Hortik gora ere badago aldea nahikoa izatetik ona edo oso ona izatera. Hori beste kontu bat da. Mailaketa bat emateko esan dezakegu: sei-zazpi nahikoa. Zortzi-hamar ona. Hortik gora oso ona.

Oraindik badago eman beharreko beste zenbait argitasun, darabilgun neurtresna honekin okerreko ondoriorik ez ateratzeko. Hona bat.

Kontsonante kideak edo familia berekoak nahastean, puntu bat kentzea esan dugu. Familiatik familiara puntu hori eta gainera familia batetik bestera dagoen aldea kendu beharko da. Baina puntuazio beraren barruan familia ezberdinak sartu ditugu. Hala, hiru puntu ematen genien bokalei, K-P-T, M-N, L, LL eta Ñ-ri. Lau puntu ematen genien S-Z-X, F-J-H eta RR-ri. Hauek guztiak, hiruna edo launa puntu eduki arren, ez dira kideak. Esaterako:

3 3 3 3 = 12
L A N A
3 3 3 3 = 12
L A K A

Hemen letra denak dira berdinak N-K izan ezik. Puntu bat bakarrik kendu, ezberdinak direlako, baina bestela puntuazio berdina daukatelako? Ez noski. Puntu hori eta gainera hiru kendu behar dira, alegia, bakoitzaren puntuazio osoa. Zergatik? Kideak edo familiakoak ez izanik, puntu guzti horiek diferentzia ematen dutelako. Zenbat eta puntuazio handiagoa, hainbat alde gehiago. Hain zuzen, puntu gehiagok nortasun edo berezitasun handiagoa esan nahi du. Beraz, batetik bestera alde handiagoa. Adibideko *lana-laka* hitzen baturak hamabi ematen badu, lau puntu kendu behar dira. Beraz, zortzi. Zortziko puntuazioa nahikotik gorakoa dela esan dugu. Baina *lana-laka* errima ona al dira? Ez, oraintxe esango dugun beste arrazoi bategatik.

Azken bi silabak batera harturik ere, azkenak dauka garrantzirik gehien. Hau ondo errimaturik ez badago, alperrik da aurreko silabako edo silabetako kidetasun ederrez hornitzea. Azken silabako kontsonanteek familia berekoak izan behar dute. Beraz, *lana-laka*, zortzi puntu emanik ere, errima gaiztoa dira, N eta K familia ezberdinekoak direlako. Beste adibide batzu jartzeko, *barrabas-barraban, irabaztez-iragazten, iturritza-iturrira* eta abarrek puntuazio handia hartuko lukete, kentzekoak kendurik ere, baina horrek ez du balio. Azken silabako kontsonanteek, berdinak ez badira, gutxienez kideak izan behar dute.

Badago onartu ezineko beste kasu bat ere. Adibiderik gehienak bi hitz edo oinekin jarri ditugu, ulertzeko berdin baita. Baina bertso batek gehienean lau oin edo hitz errimatu behar ditu gutxienez. Orduan baliteke hiruk oso ondo elkarrekin errimatzea eta bat ezberdina izatea. Bala galdua bezala. Esaterako, hitz hauek: *ezkata, ezpata, ezta-ta, emana*. Lehen hirurak elkarrekin estuki loturik doaz. Laugarrena asko aldentzen da. Lauren batezbestea aterarik, puntuazio orokor ona geratuko zaigu. Baina horrek ez du balio. Lau ormako etxea egitean, bat oker edo aparte badago, han ez dago etxerik. Hemen oin guztiak berdintsuak behar dira. Lautik bat gaiztoa baldin bada, beste hiru onek ez daukate hura ontzerik.

Beste ohar garrantzitsu bat. Azken silaban kontsonanteak garrantzi handia dauka. Azken aurrekoan, ordea, bokalaren aurrekoak ez dauka hainbeste garrantzi, bokalak berak baizik. Alegia, azken silabaren aurretik eta hurbilen zein letra doan, hark dauka garrantzia. Adibidez, *laka-lasa*. Bi hitzon azken sila-

bak KA eta SA dira. K-tik S-ra dagoen diferentzia guztia kendu behar da, azken silaban baitoaz. Har ditzagun, ordea, honela: *kala-sala*. Hemen K eta S azken aurreko silabetan doaz eta bokalaren aurretik. Diferentzia guztia kendu behar al dugu? Ez noski. Azken aurreko silabako bokalari begiratu behar zaio eta horrela bi hitzetan ALA egiten dute. Errima ona, beraz. Horrekin konforma gaitezke, aurrerago jo gabe. Badakigu KALA-SALA bikotea baino kideago direla KALA-PALA edo SALA-ZALA. Baina hori onetik hoberako aldea da. Kontuan izan erriman atzetik aurreraantz goazela. Azken silabak minimorik ematen ez badigu, azken aurreko silaban hornitu behar dugu. Behin minimoa lortutakoan, aurreragoko diferentziek ez dute hura deusezten, ontzen edo hartan uzten baizik.

Atal hau amaitzeko, diogun neurtresna hau ez dela kasu guztietan arau zorrotz eta bortxagaiztzat hartzekoa. Errima arloa oso zabala, ugaria eta anizkoitza da. Arau edo neurpide nagusi batzu ematen ari gara. Arauok fosiltzen badira, amaitu da eboluzioa eta aurrerapena. Hiltzea da hori.

## ZUZENTZAILE NAGUSIA

Aurreko bi atal nagusietan errimaren hotsetik ibili gara. *Hotsen kidetasuna* zen lehenengoa eta *Errimaren neurria* bigarrena. Errima izan ere hotsaren berdintasuna edo kidetasuna da. Hots hori fisikoki eta matematikoki neurtzekoa da. Hotsaren materialtasuna esango genukeena. Baina hemen ez gabiltza tresna elektronikoekin, gizakiekin eta hizkuntzekin baizik. Materialki hoskidetasun ona ematen duten hitzak errima txarra izan daitezke eta alderantziz, hoskidetasun hain ona ez emanik, oso errima ona egin. Hauxe da arau zuzentzaile nagusia, aurreko arauak bezain garrantzitsua. Arau honen oinarria batetik errima bereko hitzen izaera da, hots, zenbat eta nolako hitzak dauden errima horretan. Eta bestetik hizkuntzaren egitura, bai gramatikaz eta bai literaturaz.

Goazen lehen kasura, alegia, hoskidetasun onetik errima txarra egiten duten hitzetara. Hemen batez ere deklinabideko atzizkiak eta beste guztiak jo behar dira. Bietarik ugari dauka euskarak. Hona deklinabideko atzizki batzu: *A, ak, ek, ren-en, i-ri, ai-ei, ra, gaz-kin, an, dik-tik, tzat* eta abar. Hauekin egiten diren errimek hoskidetasun handia eman dezakete: *mendira, gurdira, zaldira, lodira*. Azken bi silabak *di-ra* egiten dute, baina azken silabako *ra* hori deklinabideko atzizki bat da, lauretan errepikatzen dena. Atzizkiak ken-ipiniko piezak izanik, bat bera errepikatzean, baliabide urria gertatzen da. Lau alkandora berdin bata-bestearen gainean jaztea bezala. Alde horretatik hitz horiek errima pobrea egiten dute, txarra ez esateagatik.

Beste atzizkietara jorik ere, gauza bera esan daiteke. Euskarak atzizki ugari eta garrantzitsuak dauzka: *ki, ro, teko-tzeko, ten-tzen, lako, nean, gatik, gan, garri, gailu, tasun, pen-tzapen-men, ada-kada, egi, gabe-kabe, ari-lari, ago, ka, tzako, dun-tun, ide-kide, kuntza-kunde, era-kera, le-tzaile, or-kor, antza-untza* eta abar.

Har dezagun adibidez TASUN. Atziki honek bi silaba dauzka eta gainera oso ozenak eta indartsuak. Hiru kontsonante sendo eta bi bokal dauzka. Puntuazio osoan hamalau emango luke. Artikulua jartzen bazaio –TASUNA– beste hiru gehiago, beraz, hamazazpi. Aurretik beste kontsonate berdinen bat sartzen bazaio, are gehiago. Adibidez: *agortasuna, gogortasuna, jatortasuna, mozkortasuna*. TASUN-en aurreko kontsonantea ez ezik, bokala ere berdina daukate, denek ORTASUNA eginez. Hauen puntuazioak hogeita bat ematen du, onetik ere ia pasaturik. Errima ona al da? Ez da, ez, ona, txarra baizik. Pieza bat hartu eta bera ezartzen da denetan. Zenbat eta letra gehiago eta indartsuagoak eduki, nabarmenago gainera.

Gauza bera esan daiteke beste atzizkiez ere: *garri, rekin, egi* eta abar. Atzizki berarekin errima osatzea teilatu merkea eta arrunta da. Lau puntuko bertso berean pare bat aldiz eta ez jarraian sartzea –lehenengo eta azkenengo oinak, esaterako– disimuluan pasa liteke, baina hiru sartzerik ez daiteke justifika eta gutxiago laurak. Atzizki guztietan irizpide berdina erabiltzerik ez dagoela ere esan beharra dago. Esaterako, GARRIA eta TASUNA harturik, errima horietan atzizki horiez gainera ere badago anitz baliabide. TIK edo GATIK harturik, ordea, –*herritik, guregatik*– atzizki horiez gainera apenas dagoen errima horretan beste aukerarik. Horrelakoetan errepikatzea barkagarriago da eta kasu batzutan ez dago beste erremediorik.

Oso kontuan hartzeko beste gauza bat errima bakoitzaren hedadura da. Errima batzu oso ugariak dira, hitz eta aukera asko baitaukate. Beste batzu hitz gutxikoak dira eta ez dagoen lekutik ez dago ateratzerik. Gutxitasunak eta bitxitasunak ere bere balioa dauka. Bi gauza, onean berditsu izanik, bata urria eta bestea ugaria bada, urria garestiago eta, beraz, baliotsuago izango da. Gauza ugaria, ordea, gehienean merkea izaten da, nahizta ona izan. Hitz errimatuekin ere berdintsu gertatzen dela esan daiteke. Ez da berdin ERA amaieraz edo ITZ amaieraz errimatzea, hau mugatu samarra eta hura ugariegia baita.

Azkenik, hitzak gramatikaz eta literaturaz ere neurtu behar dira. Ez da berdin hitzak era batera ala bestera jartzea, gramatikak bere legeak baitauzka. Adibidez EL amaiera ELA baino zailago eta bakanago da. Hona lau hitz: *hel, ergel, gibel, ustel*. Hona orain beste lau: *arbela, fardela, ergela, berdela*. Hoskidetasun hutsari begiraturik, lehen lauren batura sei puntu bakarrik da, E eta L bakarrik kontatzen baitira. Bigarren laukotearena, ordea, hamasei da: *rdela, rbela, rgela*. Kontsonante bigun horiena puntu bat kendurik, hamabost. Zein da errima hobea? Agian bat hartzekotan, lehenengoa hobea. Hitz horiek, horrela artikulu gabe ondo ebakita uzteko, gramatikak bide gutxi ematen du. Bigarren laukotearekin bertso ondo josia egitea errezago da. EL erriman hitz ugari dago, baina artikulu gabe askoz bide estuagoa dago. Orduan forma hau belarriarentzat ere askoz forma deigarriagoa da.

Gramatikaz ez ezik, literaturaz ere badago hitzetan alderik. Errima polit, bizi eta bakanek balio literario gehiago eduki dezakete, bizitasun eta sarmen gehiago daukatelako. Alderantziz, artikulua eta beste atzizki deklinatzaileak

oso jenero arruntak eta ezagunak dira. Ez dira, beraz, bizitasuna eta ezustea ezartzeko egokienak. Nola sortzen da eragin hori? Hain zuzen baliabide arruntak saihestuz.

Baina kontuz. Honek ez du esan nahi baliabide arruntek gutxi balio dutenik. Ogia janari arrunta da, baina oso ona eta beharrezkoa. Hala ere, norbaiti erregaluren bat egiterakoan, inori ez zaio gogoratzen ogi bat erosterik, gose garaian edo oso ogi bereziren bat ez bada. Gaizki ulertzerik gerta ez dadin, hemen ez gara jeneroak baztertzen ari, balioak ematen baizik. Ikuspegi osoak balio erlatiboak edo konparatiboak emango ditu. Konparatze horretan, errimakera batzu garestitu eta beste batzu merkatu egiten dira. Batzu oso on bilakatzen dira eta batzu oso ahul.

## ERRIMAKERA EZBERDINEN BILDUMA

Gauza batzu esanak baditugu ere, goazen errima guztien ikuspegi orokorra ematera.

### HITZA BOKALEZ BUKATUA

1) Kontsonante bigunekin, aurreko silabako bokalaren edo kontsonatearen laguntza behar dute: *pare-gabe-hage*... edo *alda-molda, denda-landa-on da* eta abar.

2) Kontsonante sendoekin ez da beharrezko aurreko silabako bokalik edo kontsonanterik: *bata-jota-buka*... edo *barka-borta-bulka*... Baina komenizko da eta gehienean, aurreko laguntza bokalezkoa denean batez ere, berdinera jotzen da: *bota-joka-opa*...

3) Kontsonante sendoekin are gutxiago behar da aurreko bokalaren laguntzarik: *lasa-aisa-goza-luza*... Kasu honetan aurreko kontsonanterik aipatu beharrik ez dago, apenas baitago kasurik. NSA-LSA-RSA beste gabe NTSA-LTSA-RTSA bilakatzen dira: *salsa-saltsa, alza-altza, pensa-pentsa*.

4) Kontsonante oso sendoekin aurreko silabako laguntza beharrik gutxien dago: *gatza-pertza-hotsa-hutsa*. Hala ere, jakina, aurreko bokal edo kontsonante eta guzti errimatzeak indartu egiten du: *hotsa-lotsa-motza-okotza*... Edo: *gantza-antza-hontza-funtsa*. Bokal eta kontsonante, biekin laguntzen bazaio, oso indartsu bilakatzen da: *altza-saltsa-galtza-baltza*.

### HITZA KONTSONANTEZ BUKATUA

1) Kontsonante bigunez bukatzen den hitzik ez dago euskaraz, erdal hitzak edo mailebuak izan ezik: *Akab, Saleb, Dabid*... R-ez bukatuak ez dira erre bigunak, beti sendoak baizik: *ur, paper, labur*. Nahizta gero batzu, artikulua jartzean, bigunak izan: *ura, papera*...

2) Kontsonante sendoz bukatzen den hitzak nahiko indar hartzen du: *laban, edan, modan*... *zabal, azpel, zotal*... *bat, daukat, bart, erabat*... Hauetan, ordea, badago aldea beste arrazoi batengatik. N da bigunena, gehienean deklinabide baita. *Herria* edo *herrian* esatean, askotan N hori galdu egiten da, bela-

rriak ez du behar den informaziorik hartzen. Zergatik? Biak deklinabide direlako eta, beraz, oso arruntak. Hirulau bertsolari puntura ari direnean, askotan gertatzen da oker ulertze hori. L kontsonantez ere, materialki harturik, berdintsu behar luke: *zabal, gal, apal*... Ez da, ordea, horrela, hitz hauek artikulu gabe oso nabariak baitira. Hauek nekez galduko dira belarrian.

3) Kontsonante oso sendoz bukatzen den hitzak berezitasun eta zorroztasun gehiago hartzen du: *poz, apropos, noiz, goiz, biz, dizdiz*... Hemen ere Z atzizkia denean, errezago galtzen da belarrian, arruntagoa izaki: *ibiliz, ikusiz, gabez, umorez*...

4) Kontsonanterik sendoenez amaitzen den hitzak indarrik gehien hartuko du: *motz, zorrotz, beltz, ezetz, hitz, fits*... Kasu honetan gainera kontsonanteok *–ts,tz,tx–* ia inoiz ez dira atzizki eta orduan biziago edo sarkorrago dira.

## KONTSONANTEEN ERAGINA

Gorago aipatu kasuetan, aurreko silabaren azkena kontsonantea izan daitekeela ikusi dugu: *alda, olga, barka, saltsa, kezka, landa*... Sei kontsonante dira aukera hori damatenak: L, N, R, S, Z, X. Beste kasurik egotekotan, oso bakanak dira, gehienean mailebuak: *koktel, taktu* eta abar.

Esan beharrik ez dago hauetan bigunenak L eta N direla. Ez da, ordea, berdin *jende* eta *jente*, T hau D baino gogorrago baita. Beste laurak indartsuago dira: *barda, karga, borda*... Hala ere, jakina, *barda* baino indartsuago da *barka*, K eta D-ren diferentziagatik. Beste hirurek ez dute atzetik kontsonante bigunik onartzen, gogortu egiten baitute: ez *da-ezta, ikusga-ikuska, ezbai-ezpai* eta abar. Hala ere, lege hau ez da guztizkoa eta euskara guztikoa.

Kontsonante sendo hauek, S-Z-X hirukoteak batipat, azken hirugarren silabatik ere indar handia daukate. Esaterako, *jostari-agintari* eta *jostari-besteri*. Azken bi silabei begiraturik, lehen bikotea gehiago da, bietan TARI eta bigarrenean TARI-TERI baita. Baina bigarren bikotean bi hitzek daramaten erdiko S horrek indar handia baitauka, atzeko bokalak azpian hartzen ditu eta bokalaren diferentzia ia deusezten. Alde honetatik, esaterako, *bezpera-bestela* hobetzat jo daitezke *bestela-orbela* baino, nahizta azken bi silabak harturik, TELA-BELA hobeak izan TELA-PERA baino. Kasu honetan gainera S-Z-ren aurreko E bokala ere berdina da: *b-ESTELA-b-EZPERA*. Eta hitzaren haserako B ere bai.

## DIPTONGOAK ETA DIPTONGO HAUTSIAK

Bi bokal elkarren atzean joan eta silaba bakarra egiten dutenean, diptongoa dela esaten da. Noiz da diptongo edo silaba bakar? I edo U atzetik direnean. Orduan beti dira diptongo, I-U kasuan izan ezik. Honek esan nahi du I bokala dela bereziena. Baina I-U gertatzen den hitzak oso kontatuak dira, laburduretan edo izan ezik: *di(g)u, daki(g)u* eta abar. Hauek honela kantatu behar dira: *di-u, daki-u*. I eta U atzetik direla, beti diptongoa egiten dute: *bai, alai, sei, goi, arrazoi, bustindui... hau, barau, geu, baneu, gaur* eta abar. Bi silaba edo diptongo hautsia dela adierazteko, H-ez banatzen dira: *nahi, behi, lohi,*

*suhi*... Esan beharrik ez dago, bi bokal berdin direnean, ez dagoela diptongoa egiterik, nahizta I edo U izan: *mihi, ihi, uhu, behe*. Hauetan silaba bakarra egitekotan, *–mi, i, u, be–*, bi bokal daudela esateak ez dauka zentzurik. Beste gauza bat da toki batetik bestera ahozkatzean aldea egotea. Batzuk *bea* esango dute, beste batzuk *bêa* eta beste batzuk *behea*.

Beste hiru bokalak, A-E-O, atzetik doazen kasu guztiak diptongo hautsiak dira: *ea, ia, oa, ua; ae, ie, oe, ue; ao, eo, io, uo*. Araua, beraz, nahiko argi eta erreza da: I-U atzetik direnean, beti diptongoa, IU berau izan ezik. Beste kasu guztietan diptongo hautsia.

Zer esan hauetaz errimarako?

1) DIPTONGOAK. Diptongoz amaitzen diren hitzak nortasun handikoak dira errimarako: *bai, garai, goi, emakoi... Hau, nau, gau, geu, zeu*. Nahizta aurretik ezeren laguntzarik ez eduki, errima onak dira. Gainera horrelako hitzak ez dira asko ere. Beste arrazoi bat gehiago, beraz.

2) DIPTONGO HAUTSIAK. Diptongo hautsiak bi silaba ditu. Badirudi, beraz, aurreko kasua baino indartsuago izan behar dutela. Baina diptongo hautsirik gehienak bigarren bokaltzat A dutenak dira: *ea, ia, oa, ua*. Beste kasuak *–ae, ie, oe, ue, ao, eo, io, uo–* oso bakanak dira. A-dunak, ordea, asko dira, baina bokal hori gehienean artikulua da. Ia beti: *habea, legea, egia, begia, eroa, mandoa, burua, hartua*... Artikulua izanik, oso baliakizun arrunta da eta puntuazioa asko jaisten du. Beraz, aurreko laguntza beharrezkoago du, *Errimaren neurria* kapituluan azaldu genuenez.

## OINEN SAILKAPENA

Errimatzen dutek oinak hitzak dira, baina hitz guztiak ez dira mota berekoak. Ez dira gramatikaz berdinak. Hiztegi errimatuan sei sail egiten ditugu. Hona koadrua:

1) ADITZA:
   - a) Aditz jokatua
   - b) Aditzak
   - c) Aditz bikoitzak
   - d) Era intenporala

2) ADBERBIOAK
3) IZENORDEAK
4) ADJETIBOAK
5) IZENAK
6) ATZIZKIAK

Hitz batek bost kategoria hauetako bat izan behar du: aditza, adberbioa, izenordea, adjetiboa edo izena. Nola jarri dugun *atzizkiak* izeneko seigarrena? Oso sail berezia eta ugaria delako, nahizta berez atzizkiak gramatikaz kideak ez izan. Atzizkidun hitzek bost horietako bat izan behar dute. Badaude atzizki adizginak, adberbioginak, izenordeginak, adjetiboginak eta izenginak. Esaterako,

TU atzizkiak aditzak egiten ditu: *apurTU, sarTU* eta abar. KI atzizkiak adberbioak egiten ditu: *ederKI, poliKI, zabalKI* eta abar. Izenordeak ez dira asko eta ez dakit hauen atzizkirik badagoen ere. TSU atzizkiak adjetiboak egiten ditu: *indarTSU, zorionTSU*. ERA atzizkiak izenak: *lodiERA, jaikiERA*. Atzizkiak ez dira, beraz, sail gramatikal berezia. Baina euskaraz atzizki multzoa oso garrantzitsua denez gero, eta, gramatikaz ez bada ere, familia oso zabal eta elkarrekikoa osatzen dutenez gero, hemen ere sail ezberdintzat jarri ditugu, sailkapen argiagoa eta errezagoa egiteko.

Hiztegi errimatuaren egitura sail horien arabera egina da, aditzaren kasuan lau azpisail dauzkala. Sail horien arabera eta ordena horretantxe. Goazen orain sail bakoitza zer den azaltzera.

## ADITZAK

Aditzak norbaiten edo zerbaiten egintza edo jarduna adierazten duten hitzak dira: *jan, jo, ikusi, izan, ukan, eduki, ibili, egon ,sartu, eutsi*... Hizkuntzaren bizkarhezurra aditza da. Aditza hauetako batzu jokatu egiten dira, IZAN esaterako: *naiz, haiz, da, gara, zara, zarete, dira, nintzen balitz, nadin*... IBILI: *nabil, habil, dabil, gabiltza, balebil, nenbilen, bebiltza*...

Jokatzen diren aditzotan badaude beste aditzen laguntzaile gisa erabiltzen direnak. Garrantzitsuenak IZAN, EDUN-UKAN, EDIN, EZAN dira. Azken bi hauek aditz aparteko gisa ez dira ezagutzen, forma jokatuetan baizik. Laguntzaileak beraz beste aditz bat jokarazten du. Esaterako: *etorri NAIZ, ibili NINTZEN, egon BANINTZ*... *ekarri DUT, ikusi ZUEN, eramango NUKE*... *joan NADIN, etor BEDI*... *jan DEZAN, egin NEZAKEEN*... Bizkaieraz EDIN eta EZAN ordez beste laguntzaile batzu daude. Argiago ikusteko, hona IZAN jokatua, aldi oso bat harturik:

Egon NAIZ
Egon HAIZ
Egon DA
Egon GARA
Egon ZARA
Egon ZARETE
Egon DIRA.

Hemen EGON aditza ez da aldatzen. IZAN da aldatzen edo jokatzen dena. Jokatzen den hori EGON aditzaren ondoan doa, honi laguntzen. Horregatik aditz laguntzaile esaten zaio. Har dezagun orain EDUN laguntzailea:

Egin DUT
Egin DUK-DUN
Egin DU
Egin DUGU
Egin DUZU
Egin DUZUE
Egin DUTE

Hemen ere EGIN aditza geldi dago, ez da aldatzen. Jokatzen dena EDUN da eta horregatik laguntzaile esaten zaio. Laguntzaile diren aditz jokatuak a) sailean sartzen dira.

Baina badaude, laguntzaile izan ez arren, jokatzen diren beste aditz batzu: EGON, IBILI, EDUKI, ERAMAN… Har dezagun IBILI: *nabil, habil, dabil, gabiltza, zabiltza, zabiltzate, dabiltza.* Aditz hau jokatzen da, baina ez beste bati laguntzeko, bere burua erabiltzeko baizik. Berak bakarrik daki ibiltzen. Beste aditz batzuk, ordea, ez dute balio hori egiteko. Esaterako: JAIKI, ERORI, JASO, JAN… Hauek martxan jartzeko, laguntzailea behar da: *jaiki NAIZ, jan DUTE…* Euren buruentzat bakarrik jokatzeko gai direnei aditz sintetikoak esaten zaie. Izenak da gutxiena. Aditz laguntzaileak lau direla esan badugu, zenbat dira beste sintetiko hauek? Hona garrantzitsuenak:

NOR-NORI sailean: *egon, ibili, joan, etorri.* badaude forma batzutan jokatzen diren beste batzu ere, baina askoz garrantzi gutxiagokoak: *etzan, erion, jarraiki…*

NORK-NORI sailean: *ekarri, eraman, eduki, erabili, jakin, ihardun, egin, iraun, irudi, ikusi, ezagutu, eritzi, erran, irakin…* eta gutxi gehiago. Hauetariko batzu asko eta forma askotan erabiltzen dira, beste batzu askoz gutxiago eta batzu oso forma bakanetan.

Atal hau amaitzeko, aditzaren a) sailean, jokatzen diren aditz guztiak sartzen dira, bai laguntzaileak bai sintetikoak. Euskaraz aditz jokoa, laguntzailearena batez ere, oso zabala eta ugaria da. Gure hizkuntzaren berezitasun eta zailtasunik handienetarikoa aditzaren hedadura mugagabea da. Horregatik errima askotan edo gehienetan agertuko da aditz jokatu horren saila.

Aditzaren b) sailean *aditzak* jartzen dugu. Hemen aditzak partizipio forman datoz, euren izendapen hutsean, hiztegian datozen bezala: *ekarri, eraman, jaso, utzi, eduki, jo, sartu, ikusi, itxaron, irakurri, jausi…* Sail honetan ere euskarak aniztasun handia dauka. Gaztelaniaz, adibidez, aditz infinitibo guztiak hiru amairen barruan sartzen dira. AR-ER-IR: *cantar, jugar, amar…comer, torcer, meter…vivir, lucir, dormir…* Gaztelaniaz, beraz, honelako aditz formekin hiru errima bakarrik daude. Euskaraz ugaritasun handia dago: *atera, erre, ase, bete, busti, erori, jaiki, egon, ibili, ito, jan, utzi, erakutsi, etzan, erran, esan, ikusi, igorri, kendu, sakatu, hoztu, eho, igaro…* Errima ezberdin askotakoak.

Aditzaren c) sailean aditz bikoitzak sartzen ditugu. Badaude aditzak, bi elementuz osatzen direnak: *hitz egin, bildur izan, gorroto ukan, maite ukan, barre egin…* Hauek gaztelaniaz hitz bakarra daukate: *hablar, temer, odiar, amar, reír.*

Azkenez, aditzaren d) sailean era intenporala jartzen dugu. Aditzik gehienak amaieran I edo DU-TU atzizkia daramate: *etorri, ikusi, hautsi… kendu, galdu, hartu, sartu…* Atzizki hori kendurik, aditza era intenporalean geratzen dela esaten da: *etor, ikus, hauts, estal, bil, ken, sar, har…*

## ADBERBIOAK

Adberbioak aditzaren lagunak dira. Har dezagun IBILI aditzetik NI NABIL. *Ni* hori NOR da, hots NI naiz dabilena. Baina ibiltze hori ez da beti berdina, era askotakoa baizik. Nola? Noiz? Non? Zenbat? Galdera hauei erantzuten dietenak adberbioak dira. Nola nabil? Erantzun posibleak: *ondo, gaizki, zuzen, oker, ederki, herrenka, juxtuki, azkar, astiro, korrika...* Noiz nabil? Erantzun posibleak: *atzo, gaur, orain, gero, laster...*Non nabil? Erantzunak: *hemen, han, hor, goian, behean, aurrean, atzean, urrun, hurbil...* Zenbat nabil? Erantzunak: *asko, gutxi, maiz, nahikoa, aski...* Adberbioak, beraz, aditza zertan den adierazten du, aditzaren laguna edo aditzarekin doana da. Galdera horiez gainera badago beste anitz adberbio. Hona batzu: *Bai, ez, noski, agian, beharbada, blast, irrist, arte, arren, ondoren...* Horiek denak eta baita galderak eurak ere –*noiz, non, nola, zelan...*– adberbioak dira.

## IZENORDEAK

Izenordeak izenaren ordez jartzen direnak dira. Adibidez: *zuen aita ikusi nuen, baina BERAK ez ninduen ikusi.* BERAK hori *aita*-ren ordez dago. Bestela esan beharko genuke: *Zuen aita ikusi nuen, baina zuen aitak ez ninduen ikusi.* Horrelako errepikarik ez egiteko, izenordeak daude. Batzu pertsonalak dira: *ni, hi, ha-hura, bera, gu, zu, zuek haiek, eurak-berak.* Beste batzu erakusleak: *hau, hori, hura...* Izenordeak oso gutxi dira, baina direnak oso egokiera handikoak.

## ADJETIBOAK

Adjetiboak izenaren lagunak dira, izena nolakoa den esaten dutenak. Berez ez dira ezer, eranskinak baizik, izen baten soinean joan behar dutenak. Adibidez, *zakurra* eta *zerua* izenak dira. Zakurra tokatzen den lekuan ez dago zerua esaterik. Baina zakurrak eta zeruak adjetibo berdinak eraman ditzakete: *onak, beltzak, handiak, txikiak, azkarrak, gaiztoak, arinak, astunak, maitagarriak* eta abar. *Etxea* izena da da. Baina nolakoa da etxea? Era askotakoa izan daiteke: *handia, estua, zabala, apala, garaia, beroa, hotza, merkea, garestia, harrizkoa, zuria, nabarra* eta abar. Horiek adjetiboak dira. Beraz, gauza bat nolakoa den galderari erantzuten diotenak adjetiboak dira.

## IZENAK

Izenak nortasun edo izate propioa daukatenak dira. Baliteke izate materiala edukitzea: *harria, mendia, ibaia, zozoa, astoa, teilatua, kalea* eta abar. Edo izate ezmateriala edo kontzeptuala: *nortasuna, osasuna, zabalera, begirada, hasera, zoramena, dastapena, ideia* eta abar.

Oro har, gutxien balio duen saila izenak dira. Zergatik? Gauza bat eta bera esan nahi dutelako. Gauza konkret bat esan nahi dutelako. Orduan izen bakoitza, bera tokatzen denean bakarrik dago ondo. Erriman izenak ondo egokitzea zailago da adjetibo edo adberbioekin jokatzea baino.

Badaude noski berez balio handia daukaten izenak: *lurra, itsasoa, eskua, zuhaitza, mendia, kalea, etxea* eta abar. Hauek oso kontzeptu garrantzitsuak izanik, asko erabiltzen dira. Beraz, errimarako ere bide gehiago emango dute.

Badaude izenak, esanahi deribatuz, konparazio gisa erabiltzen direnak: *iturri, bide, ate, baru, gailur, ardatz...* Hauek ez dira gehienean euren esanahi materialean erabiltzen, beste esanahi konparatiboan baizik: *diru iturria, gorrotoaren bidea, askatasunaren atea, itxaropenaren gailurra* eta abar. Horietan *iturria* ez da ura ematen duen zer materiala. Berdin besteak ere. Honelako izenak egokiera handikoak dira eta izenen baliorik onena erabilera honetatik dator. Horretarako biderik ematen ez duten izenak nekez gertatzen dira ondo, haietaz zuzenki kantatzen ari ez bagara.

### ATZIZKIAK

Atzizkiak oso garrantzitsuak dira hizkuntza guztietan eta euskaraz areago esan daiteke. Atzizki handi bat edo bi dauzkan errimak aukera handiagoa edukiko du. Gainera euskaraz atzizkiak oso ugariak dira. Horregatik sail berezian jartzen ditugu, nahizta berez aurreko bost sailetan banaturik egon behar, segun bakoitzari non tokatzen zaion. Hala ere, beste aldetik oso sail jakina egiten dutenez gero, aparte sailkatzeak abantaila handiak dauzka, hobeto gogoan hartzeko.

## BALORAPENA

Goazen orain sail hauen balorapenera. Aditza esaldiaren eta hizkuntzaren bizkarhezurra da. Gainera euskaraz oso ugaria eta anizkoitza da. Aditz forma asko ezohikoak izanik ere, badaude asko eta asko hitzegitean erabiltzen direnak. Aditz jokatua, dela laguntzailea, dela sintetikoa, ia errima mota guztietan azalduko zaizu. Hain garrantzitsua izanik, errima bakoitzean agertzen diren aditzak gehienean oso erabilgarriak izango dira.

Adberbioak aditzaren lagunak dira. Aditzak garrantzi handia baldin badauka, adberbioak ere inguruan ibiliko dira. Gainera adberbioek abantaila handi bat daukate, hots, ez direla deklinatu behar. Pieza eginak bezalakoak dira, dauden bezala uztekoak. Esatera, *ongi, gaizki, ederki, aina, lain, nola* eta abar beti dira berdin, esaldia hala nahiz hola etorri. Badaude, bai, adberbio hauei ere gaineratzeko moduko atzizkiak: *ongien, ederkiago* eta abar. Baina atzizki hauek ez dira deklinabidezkoak.

Izenordeak gutxi baina oso garrantzitsuak dira. Hain zuzen, izenen ordez joatekoa izanik, noiznahi eta nonahi egokitzen dira ondo. Pentsa, adibidez, *ni, gu, hura, haiek, hau, hori* eta abar zenbat aldiz agertzen diren hizketan. Izenen ordezkariak direnez gero, normala da milaka aldiz agertzea, milaka izenen ordezkaritza baitaramate. Hauek, ordea, deklinatu egin behar dira eta ez dago adberbioak bezala nolanahi uzterik.

Adjetiboen saila dator hurrengo. Adjetiboak izena nolako den esaten du. Alde horretatik izen ezberdin askori adjetibo berdinak erants dakizkioke. Adjetiboak lorerik lore dabiltzan erleak bezala dira. Norinahi eta zerinahi ezartzekoak. Adibidez, *ona, txarra, handia, txikia, okerra, zuzena, jatorra, bikaina, ederra, polita* eta abar izatea edozein izeni egon dakioke ondo. Beste gauza bat da egia ala gezurra izatea. Baina egia hutsean ere, adjetibo bakoitzak hedadura zabala hartzen du eta, beraz, egokiera ugari dauka. Adjetiboen eragozpen bakarra deklinatu beharra da.

Azken sailean izenak datoz. Badirudi garrantzitsuenak hauexek izan behar dutela, baina ez. Hain zuzen, izenak nortasun independentea daukalako, ez du balio noiznahi erabiltzeko, bera tokatzen denean baizik. Adibidez, *etxea, jainkoa, herria, ilargia* eta abar badakigu garrantzitsuak direla. Prezioa jartzea joez gero, oso garestiak lirateke. Baina horrexegatik hain zuzen, ez dute permutatzeko balio. Badaude noski egokiera handiko izenak, gorago esan bezala. Baina sail bezala, hauexek dira errimarako gutxien balio dutenak. Horrek ez du esan nahi esaldi luze bat izen gabe egin litekeenik. Hemen ez gara esaldiaren barruan ari, honi dagozkion elementuetan, errimatzeko ointzat, egokienak zeintzu diren baizik. Izenak errimarako ez dira aisa moldagarri, hain zuzen hizkuntzan garrantzitsuenak direlako. Izenik gabe alperrik da aditz, adjetibo eta dena. Baina errima arloan, bera da manipulatzeko tarte gutxien uzten duena.

## BARIAZIOAREN BALIOA

Bost sailen banakuntza egina dugu, gramatikaren arabera. Atzizkiek ere, beste ikuspegi batetik, oso sail berezia egiten dutela esan dugu. Beraz, badaude sei sail. Aditz barruan ere lau azpisail daudela esan dugu: *aditz jokatua, aditzak, aditz bikoitzak, era intenporala*. Koadrua honela osatzen dugu:

1) ADITZA:
   - a) Aditz jokatua
   - b) Aditzak
   - c) Aditz bikoitzak
   - d) Era intenporala

2) ADBERBIOAK
3) IZENORDEAK
4) ADJETIBOAK
5) IZENAK
6) ATZIZKIAK

## ATZIZKIAK

Honek esan nahi du errimatzeko bederatzi era ezberdin dauzkagula. Errima batek bederatzi horietatik zenbat eta gehiago eduki, aukera gehiago emango du. Beraz, konbinapen bariatuak egiteko ere modu gehiago.

Sail guztiak edo bederatzirak dauzkaten errimak ez dira asko izango. Baina errimarik gehienek edukiko dute mordo bat. Gehienek badaukate aukera aberats hori eta batzuk ia gehiegi. Beste batzuk sail bakoitzean hitz gutxi edukiko dute, baina eurak onak. Badaude noski aukera urrikoak ere.

Oro har, sail edo aukera ezberdinen aberastasun hori guztiena da. Beraz, errima pobrea litzateke ebatura edo egitura bereko errima erabiltzea, aukera egonik. Hona pobretasunaren zenbait ezaugarri:

– Atzizki berarekin errimatzea: *maitagarri, izugarri... maitasuna askatasuna... aitari, denari, daudenari... dituztela, gaituztela... galtzen afaltzen... galtzeko saltzeko... jatera, edatera... onerako, bakerako* eta abar. Eta hala beste atzizki batzu: DU-TU, TZERA, TZETIK, TZEAN eta abar.

– Aditz beraren jokoa: *nator, hator, dator... nabil, dabil... gabiltza, zabiltza... nago, dago... gaude, zaude, daude... dauka, nauka...*

## DEKLINABIDEA

Badaude errimak, ia deklinabide hutsez moldatzen direnak eta beste aukerarik ez daukatenak. Adibidez N atzizkian azkentzat daukatenean: *herrian, lurrean, moduan, urtean...* Hauetan gehienean ez dago bariaziorako modurik. Horregatik dagoena ondo probetxatu behar da.

Kasu hauetan badago, hala ere, oso gogoan edukitzeko zer bat. Hitz asko deklinabidez eginak izan arren, mentalki adizlagunak dira: *aurrean, erdian, artean, kanpoan, bitartean, segituan, bat-batean, segidan, behingoan, galdu-gordean...* Nahizta gramatikaz hitz hauek deklinabidetik etorriak izan, mentalki eta hizkuntzaz adizlagunak dira. Beste deklinabidezko atzizki batzutaz ere berdin esan daiteke. RA: *kolpera, batera, aurrera...* IK: *isilik, zintzilik, bizirik...* TIK-DIK: *gogotik, ondotik, oraindik...*

Errimaren bariazioak ez dio errimari berarik bakarrik eragiten, esaldi osoari baizik, batez ere izenordeak, adjetiboak eta izenak direnean. Hauek deklinatu egin behar dira. Har ditzagun, esaterako, hitz hauek: *herria, berria, zerria, gerria, aterria.* Hauek bi gauzatarik bat izan behar dute derrigor: aditz intransitiboen subjektu, NOR, edo aditz transitiboen konplementu, NOR. Hitz horiek horrela uzteko, esaldiak ere horrelaxe josia beharko du. Esaldia baldindu edo mugatu egiten dute. Bestela ez dago oin horiek horrela uzterik. Beraz, esaldi edo puntu bakoitza egitura berean egin behar bada, bertso osoak ere monotonian dihardu.

Adberbioek horretan ez daukate eragozpenik, esaldia hala nahi hola moldatu, beti berdin gelditzen baitira. Ez dira deklinatzekoak, pieza eginak baizik. Beraz, edozein esaldi motatara egokitzen dira. Aditza ez da deklinatzen, baina bai jokatzen. Gehienean errima mota baten barruan egitura berdintsuko aditzak tokatuko dira. Adibidez, KE erriman: *daiteke, naiteke, liteke, leudeke, geun-*

*deke*... Hala ere, normalean aditzaren monotonia hausteko era gehiago dago askoz ere.

Hau guztia kontuan edukirik eta errima baten barruan aukera ezberdinak badaudela emanik, zenbat eta gehiagto konbinatu, aberatsago izango da. Edo behintzat bariatuagoa. Horrela esaldiari eta bertso osoari ere zaulitasun eta freskotasun gehiago emango zaio.

Janaren konparazio bat jarriko dugu. Demagun janariak bost sailetan banatzen ditugula: abereak, arrainak, hegaztiak, barazkiak eta frutak. Janari aberatsa denerik jatea litzateke. Bariatua behintzat. Horrek ez du esan nahi okela hutsez –txuleta eder bat, esaterako– ederki jaterik ez dagoenik. Baina kontuan har ez dugula txuleta hutsa jaten. Hark badauka olioa, berakatza, gatza. Ogia eta ardoa ere gehienean han izango dira, baita entsalada ere. Ondoren postrea eta azkenik kafe-kopak eta purua. Begira zenbat gauza sartzen den *txuleta bat jango al dugu* esatean.

Azkenik, badago beste arrisku bat: *errimakeria*. Biribiltasunaren edo kontundentziaren bila ibiliz, hirulau hitzen inguruan jarduteko tentazioa sor liteke. Adibidez: *antzekoa, lantzekoa, trantzekoa, gainontzekoa.* Atzizki beraren baliatzez gainera, gehiegi kargatzea gerta liteke. Belarria gozatu beharrean, mailukatu. On da belarria betetzea, baina ataskatu gabe. Jarritako hitzak ez diot gaizki daudenik. Adibide gisa daude soilik. Baina ez dira onegiak ere. Non dago araua? Non dago errimaren eta errimakeriaren arteko muga? Ez dago arau zehatzik. Errima kontu hau eremu zabala da. Baina badago eremu bat eta erizpide batzu. Bakoitzaren senak jokatu behar du hor, baliabide eta estilo ezberdinak ere badaudela kontuan edukirik.

# NEURRIA

Bertso teknikaren gauzarik zailena neurtzea da, ez baita nolanahi neurtu behar, oso zehazki baizik. Neurriak ez du gorabeherarik onartzen. Honetan gehiena eta gutxiena bat dira. Ez du zaulitasunik onartzen. Har dezagun zortziko txikiaren egitura:

1 2 3 4 5 6 7
1 2 3 4 5 6

Eta honela beste sei lerro, binaka baturik. Zortziko txikia zazpi-sei ritmoan doa. Zenbaki horiek ez dute ez bat gehiago ez bat gutxiago onartzen. Juxtuki neurtu behar dira. Bestela gaizki dago eta gaizki emango du. Erriman zaulitasun handia dagoela ikusten genuen, arinetik zorrotzera, zabalagotik estuagora. Ezberdinak izango dira, baina denak dira errimak. Neurrian ez dago horrelakorik. Alanbre gainean joatea bezala. Joan ala erori. Hor ez dago bien bitarterik. Beste gauza bat da, gainean joanez, mugimendu politak ala zakarrak egiten dituen.

Bertsolaritzaren lehen eragozpen nagusia –eta sekula guztiz menderatzen ez dena-, neurria da. Gero, behin neurria poliki menderatutakoan, zailtasunak eta aurrerapenak errimatik datoz. Errima oihan mugagabea, guztietariko zuhaitz eta zuhaizkaz. Oihanean sartzea ez da zaila, baina oihana menperatzea beste kontu bat da. Nornahi da gai, hitz bat emanik, *lurra* adibidez, horren beste errimakide batzu aurkitzeko: *egurra, elurra, gezurra, hezurra, lapurra, zakurra*... Hitz horiekin zerbait esateko ere, nornahi da gai. Baina zerbait hori neurturik kantatzeko, nornahi ez da gai.

Nola neurtzen da? Berez? Berezko senez? Ez dago berezko jardunik, bere barne lege batzu ez dauzkanik. Beste gauza bat da ohartuz ala oharkabez egiten den. Sarritan oharkabez egiteari, norberak nola ez dakiela zerbait egiteari, *berezkoa* esaten zaio, baina berezko horrek bere egiturak eta arierak dauzka. Gauzen barne lege horiek aurkitzea da zientziaren eginkizuna. Oraindik legerik gehieneak ezkutuan daude, estaliak. Baina horrek ez du esan nahi ez daudela, ez dakigula baizik. Neurrian ba al dago legerik? Nola neurtzen da? Ba al

dago klaberik edo sistematua izateko moduko jarduerarik? Horretara goaz hain zuzen.

## ZAZPI ATAL HANDI

Neurtzea honenbeste silaba sartzea da. Ondo neurtzeko, beraz, hitzekin halakoxe konbinapenak egin behar dira. Hitzekin jokatu behar da. Hona, ordea, hitz guztiak ez direla berdinak. Batzu **ken-ipinikoak** dira, hain zuzen esaldiari zaulitasuna damaiotenak. Hitz horiek behar ditugu. Lehen atal nagusia hain zuzen hitz horiexekin egingo dugu.

Badago beste atal handi bat: **atzizkiak**. Atzizkietan badaude, hitzetan bezala, kendu nahiz ipinikoak. Edo kendurik nahiz ipinirik, esaldiari alde handirik ezartzen ez diotenak. Bai, ordea, neurriari. Horiek ere behar ditugu eta horixe izango da bigarren kapitulua.

Hirugarren atala: **hitz elkartuen egitura**. Euskararen berezitasun handi eta ugarienetako honek klabe eder bat emango digu.

Badaude hitzak, ezberdinak izan arren, gauza bera esan nahi dutenak. **Hitz sinonimoak.** Baina silaba kopuru ezberdinekoak. Adibidez: *maiz-sarri-sarritan-anitzetan, irten-atera-jalgi-ilki*... Badaude, guztiz sinonimoak izan ez arren, oso **antzekoak** direnak eta gehienean esaldiari esanahirik aldatzen ez diotenak. Adibidez: *erre-kiskali, polit-dotore, abere-animalia*... Hitz hauekin beste atal handi bat egingo dugu.

Beste atal handi bat **laburdurak eta luzadurak** dira. Laburdurak batez ere. Adibidez: *egin-ein, ezazu-zazu, genuen-genun*... Ez da kapitulu laburra izango.

Seigarren atala **elipsia** da. Hitz batzu jan egiten dira. Hizkuntza elipsiz betea dago. Bertsoetan, euskaraz batez ere, milaka elipsi egiten da, komeni denean. Baina ez dago edozein hitz jaterik. Elipsiaren giltzak aurkitzea izango da kapitulu honen zeregina.

Azkenik **diptongoak**. Noiz da diptongoa eta noiz diptongo hautsia? Neurtzeko eta ondo neurtzeko, oso beharrezko da hori.

Baliteke beste zenbait maratila ere egotea. Baina neurriaren mekanismoak jotzeko, zazpi hauekin funtsezkoenak aurkitu ditugula uste dut. Klabe hauexei esker da neurtzea posible. Hauexek ematen dute hain harrigarria dirudien neurketa zehatzaren bidea.

# I

# HITZAK

Esan bezala, kentzeko nahiz ipintzeko balio duten hitzak behar ditugu. Esanahirik aldatu gabe, silaba gehiago edo gutxiago ematen dutenak. Batzutan silaba bat behar izaten da, beste batzutan bi edo hiru edo gehiago. Beraz, silaba bakarreko, biko, hiruko edo gehiagoko hitz magiko horiek komeni zaizkigu.

## SILABA-BAKARRAK

ADBERBIOAK: *Bai, ez, ba, ba-, lehen (len), oin (orain), hain, txit, be, e (ere), gaur. Han, hor.*

IZENORDEAK: 1) Pertsonalak: *ni-nik, neu-neuk, heu-heuk, hi-hik, hark-haik, gu-guk, zu-zuk, geu-geuk, zeu-zeuk.*
2) Erakusleak: *ha, hark, hau, hauk, hoik, hok (hauek) hek (eurak).*

Beste batzu: *oi, ai, to, txo, ahal (al), maiz, zein, zer.*

Hona gaizki neurturiko bertso bat:

| | |
|---|---|
| Kantatu behar dut | –1 |
| bertsotan hitza | –1 |
| berez ezin dut baina | –0 |
| badago giltza | –0 |
| Ederki dakigu | –1 |
| nola den bizitza | –0 |
| kantatzeko gogoan | –0 |
| pozik gabiltza | –1 |

Ikusten denez, bertso honetan zazpi lerrori silaba bana falta zaie, beste hirurak ondo daudelarik. Dagoen bezala bertso txarra da, oso gaizki neurturik baitago. Hona silaba bakarreko horiekin osatua:

Kantatu behar dut nik
gaur bertsotan hitza
berez ezin dut baina
hor badago giltza.
Ederki badakigu
nola den bizitza
kantatzeko gogoan
gu pozik gabiltza.

Bertso hau tentelkeria bada ere, ondo neurturik dago. Ondo neurturik baldin badago, ez da hain tentela. Silaba bakarreko horiexek eman digute bidea. Eta beste konbinapen asko egin zitekeen.

*Beste batzu* sailean sartuak nire ustez garrantzi edo egokiera gutxiagokoak direla esan nahi du.

## SILABA BIKOITZAK

Sail hau askoz luzeago eta ugariago da, silaba biko hitzak askoz gehiago baitira.

ADBERBIOAK:
- *Aizu, beraz, noski, otoi-arren, segur-ziur, oso-guztiz-arras-arrunt, aurki-nonbait, zinez-egiz, hortaz-hortan, orain, gero, lehen, egun, baldin, bada, ondo-ongi-ontsa, gaizki-txarto, behintzat, aisa, aldiz, berriz, bate, ere, bere, antza, txito, zeren.*
- *Hona, horra, hara, hala, hola, hemen, hortik, handik.*
- *Honen, horren.*

IZENORDEAK:

1) Pertsonalak:
- *Hura, bera, haiek, bera, eurak-eak, zuek-zeuek, gerok-gerauk.*
- *Niri-neuri, hiri-heuri, hari, guri-geuri, zuri-zeuri, zuei-zeuei, haiei, eurei, berei, geuroi-geroi.*

2) Erakusleak:
- *Hori, hura, bera.*
- *Honek, horrek, harek, berak, hauek, hoiek, haiek.*
- *Hori, horri, hari, hauei, hoiei, haiei.*
- *Hontan, hortan, hartan.*

POSESIBOAK:
- *Ene, nire-neure, hire-heure, haren, bere, gure-geure, zure-zeure, haien, euren-beren, zuen-zeuen.*
- *Honen, horren, haren, hauen, hoien, haien*

ELKARRIZKETA HITZAK: *Gizon, andre, mutil, neska, lagun, jauna-jaunak, gazte.*

BESTE BATZU: *Atzo, bihar, etzi, tori, hainbat, asko, anitz, alta, inoiz, noizbait, nonahi, beti, bapo, franko, sarri, omen, berez, bide (ez bide da), bertan, ea, baita, ezta, ohi, ote, aski-nahiko, zerbait, ustez denak-denok, denei-denoi, zenbait.*

Ikusten denez, bi silabakoetan badago aukerarik franko. Nola hautatuak dauden? Ez nolanahi noski. Berriz ere adberbioak eta izenordeak ageri zaizkigu. Horrek esan nahi du adberbioak direla giltz handietariko bat. Zeinahi gai eta une dela, zeinahi bertsotan hitz batez, adberbio horietariko pila bat egoki jarriko da. Sartzen badira, ez daude sobera eta, kentzen badira ere, ez du protestatuko. Horrexegatik dira baliosak. Badakigu *orain*-en lekuan *lehen* sartzea ez dagoela ondo, baina presentean ari garela, *orain* sartzeak ez du traba handirik egingo. Berdin iraganean *lehen* eta etorkizunean *gero*.

Bigarren giltz handia izenordeak dira, bai pertsonalak, bai erakusleak. Hauen balioa eta ugaritasuna bistan dago. Pentsa zenbat aldiz erabiltzen ditugun hitz horiek. Baina gehienean, kendurik nahiz jarririk, esaldiak ez du ezer funtsezkorik galtzen edo irabazten. Zergatik? Aditzak adierazten dituelako. Adibidez, *esango dizut* nahiz *neuk esango dizut zuri* berdintsuak dira. Baina hiru silabaren aldea. Jartzen badira, ondo, eta, jartzen ez badira ere, gehienean aditzean adierazita daude.

Izenordeek halako garrantzia baldin badute, horien posesiboak ere garrantzizkoak izango dira. Adibidez, *munduan bada lekua* nahiz *gure munduan bada lekua* berdin da. Guztira ere zazpi direnez gero –*ni, hi, hura, gu, zu, zuek, haiek*–, horien posesiboren bat noiznahi ondo egokitzea ez da batere harrigarri.

Elkarrizketa hitzetan sartu ditugunak oso hitz erabiliak eta arruntak izaten dira, bide batez esaten direnak. Adibidez: *Aizu, zer ordu da?* Edo *andre, mutil, lagun*... segun norekin hizketan ari den.

Hona gaizki neurturiko zortziko handi bat:

| | |
|---|---|
| Kantatuko dut bertso bat | –2 |
| gustatzen zaiguna | –2 |
| hizkuntza ez al da | –4 |
| maite dugun laguna | –1 |
| Neurtzea ez da sekula | –2 |
| izan lan biguna | –2 |
| saia beharra dela da | –2 |
| denok dakiguna. | –2 |

Hainbeste silabaren hutsa duela, bertso hau ez da ez bertso ez ezer. Begira orain emaniko hitzez osatua:

Kantatuko dut bertso bat, jaunak
guri gustatzen zaiguna
gure hizkuntza ez al da gero
guk maite dugun laguna?

Neurtzea ez da sekula ere
izan lan oso biguna
saia beharra dela da noski
denok ondo dakiguna.

Bertso hau kantatzen baduzu, belarria gozatuko dizu. Edo behintzat ez dizu minik egingo. Emaniko hitzekin mila konbinapen ezberdin egin daitezke, eta hainbat aproba eta ariketa egin ondoren, beti aurkituko duzu hitz horietatik mordo bat, nonahi ondo egokitzen direnak.

## HIRU SILABATIK GORAKOAK

ADBERBIOAK: *Bederen, behintzat, akaso-agian-beharbada, batere, seguru-segurki-segurrenik, erabat-zeharo-osoki-biziki, batipat, behinipehin-behinik behin-behinepin, horratik-horratio-horratino, horretaz-horretan, benetan-egitan-egiazki, arean, funtsean, orduan, ordea-ostera, nolanahi, nolabait-zelanbait, inola, sarritan-askotan-frangotan-anitzetan, ederki-ederto, poliki-polito, alegia, dirudienez. Honela, horrela, hemendik, hortatik, bertatik.*

IZENORDEAK: 1) Pertsonalak: – *Herori, zerori, berori, neroni, geroni, neronek, herorrek, zerorrek, berorrek, beraiek.*
– *Zueri, haieri, hareri, neroni, herorri, geroni, zerorri, beraiei.*

2) Erakusleak: – *Berorrek, horiek.*
– *Horiei, beraiei.*
– *Honetan, horretan, haretan, hauetan, horietan, haietan.*

POSESIBOAK: – *Neronen, herorren, beraren, beraien, geronen, zerorren, zeroien, nihaurren, hihaurren, guhaurren, zuhaurren.*
– *Beronen, berorren.*

ELKARRIZKETA HITZAK: *Gizona-gizonak, entzule-entzulea-entzuleak, adiskide-adiskidea-adiskideak, laguna-lagunak, anaiak, anai-arrebak, neba-arrebak, senide-senideak, ahaide-ahaideak, mutila-mutilak, gaztea-gazteak, jaun-andreak.*
*ONA-ONAK: lagun, jende, jaun, entzule, adiskide...*
*MAITE-MAITEAK: lagun, jende, jaun, andere, entzule...*

## ADBERBIO BIKOITZAK

Badaude azkenik bi hitzez osatzen diren adberbioak, oso erabiliak:
– *Hain zuzen, hain suertez, dena den, dena dela, nolanahi den, nolanahi dela, gaur egun, bihar-etzi, hitz batez, hitz batean, hitz bitan, segur asko, sarri askotan.*
– *Hona hemen, horra hor, hara han, hona bada, horra bada, hara bada, hona ba, horra ba, hara ba.*
– *DENEZ: agi, itxura, antza.*

*ERE: inoiz ere, inola ere, inor ere, inon ere, ezer ere, deus ere, sekula ere, beti ere, hemen ere, nolanahi ere, noiznahi ere, nonbait ere.*

Hauek denak ERE kendu arren ondo daude. Beraz, ken nahiz jar. Hain noiznahi eta nolanahi erabiltzekoa izanik, baliakizun handia da hitz hau.

Adibide bat jartzeko, zortziko txiki bat handira pasatuko dugu.

| | |
|---|---|
| Bertsolaritzak badu | 3 |
| oraindik indarra | 2 |
| uste da baina ez da | 3 |
| arbola iharra. | 2 |
| Itzaltzen baldin bada | 3 |
| dakarren txingarra | 2 |
| ez da sugile txarra | 3 |
| goizeko pitarra. | 2 |

Bi silaba falta diren lerroetan, jakina, ez dago hiru silabakoz hornitzerik. Hona nola geratuko litzatekeen zortziko handi posible askotariko bat:

Bertsolaritzak badu benetan
oraindik ere indarra
uste da baina ez da inola
hura arbola iharra.
Itzaltzen baldin bada nolabait
orain dakarren txingarra
ez da segurki sugile txarra
hortan goizeko pitarra.

Hainbeste silaba sarturik ere –hogei guztira–, zortziko handi hau itxuroso geratzen baldin bada, ikusi ditugun hitzak zer baliotsuak diren froga hoberik ezin eman.

# II

# ATZIZKIAK

Bigarren sail handia atzizkiena da. Badaude atzizkiak –eta ez bat edo bi bakarrik-, elkarren aldakin izanik, silabaz ezberdinak direnak. Hala, esaterako, *zergatik* edo *zergatikan*. Atzizki hori noiznahi ageri dena da. Silaba baten gorabehera eduki ahal izateak neurtzeko balio handia ematen dio.

Badaude atzizkiak, kendurik edo ipinirik, alde handirik ematen ez dutenak. Adibidez *hemen* edo *hementxe*. XE-TXE atzizki hau oso maiz sartzekoa da, komeni bada, eta ez du esanahirik asko aldatzen. Berez, *hemen-hementxe* ez dira berdinak, baina kontesturik gehienetan berdintsu dira.

Badaude atzizki sinonimoak, baina silabaz ezberdinak. Adibidez, TZA eta GOA: *alkatetza* eta *alkategoa*. Honelakoak ez dira asko eta, izanda ere, ez dira hain baliosak, batetik bestera pasatzeko gehiago pentsatu behar delako.

Badaude, azkenez, atzizkia sartzean edo elkarkuntza egitean, era batetik bestera silaba baten aldea ematen dutenak. Adibidez, *Madrila-Madrilera, urrundik-urrunetik* eta abar. Badago batez ere atzizki sail bat, hitzetik zuzenki edo hitzaren genitibotik ezartzeko modua ematen duena: *aitakin-aitarekin, nigatik-niregatik* eta abar. Badirudi genitibotik egitea arau zabalagoa dela, baina hori ez da hemengo kontua. Orain axola zaiguna da era biak erabiltzen direla hizkuntza mintzatuan eta bertsolaritza horretaz balia daitekeela.

Goazen orain atzizki guztiak sailean ematera:

ANTZ-ANTZA, UNTZ-UNTZA: Norantz-norantza, noruntz-noruntza, harantz-harantza, haruntz-haruntza, honantz-honantza, honuntz-honuntza, etxerantz-etxerantza, etxeruntz-etxeruntza, beherantz-beherantza, beheruntz-beheruntza, aurrerantz-aurrerantza, aurreruntz-aurreruntza...

AZI-ARAZI: Eginazi-eginarazi, entzunazi-entzunarazi, janazi-janarazi...

AZO-ARAZO: Galazo-galarazo, joazo-joarazo...

ARTE-ARTEAN-ARTIO-ARTINO: Hil arte, hil artean, hil artio, hil artino...

DIK-TIK-DANIK: Gaurtik-gaurdanik, lehendik-lehendanik, noiztik-noizdanik, atzotik-atzodanik, betitik-betidanik, aspalditik-aspaldidanik, oraindik-oraindanik, bihartik-bihardanik...

IK-RIK: Huts-hutsik, zuzen-zuzenik, hits-hitsik, beltz-beltzik, epel-epelik, fin-finik, motel-motelik...

Gabe-gaberik, garbi-garbirik, triste-tristerik, bare-barerik, libre-librerik, oso-osorik...

KI: Gizon-gizonki, zuzen-zuzenki, fin-finki, errez-errezki, apal-apalki, umil-umilki, azal-azalki, latz-lazki, bizi-biziki, alai-alaiki, triste-tristeki, mingots-mingoski...

RO: Argi-argiro, garbi-garbiro, geldi-geldiro, bizi-biziro, handi-handiro...

Apalki-apalkiro, biziki-bizikiro, samurki-samurkiro, egiazki-egiazkiro...

KIN-KILA-KILAN: Gurekin-gurekila-gurekilan, zuekin-zuekila-zuekilan...

LA-LARIK: Dela-delarik, zela-zelarik, gaudela-gaudelarik, zirela-zirelarik, duela-duelarik, zaigula-zaigularik...

IK-IKAN: Zergatik-zergatikan, delarik-delarikan, oraindik-oraindikan, ikusirik-ikusirikan, bizirik-bizirikan, bihotzik-bihotzikan, geroztik-geroztikan...

TAKO-TARAKO: Zertako-zertarako, horretako-horretarako, ezertako-ezertarako, zernahitako-zernahitarako... Betiko-betirako, orduko-ordurako, etziko-etzirako...

NEKO-NERAKO: Deneko-denerako, datorreneko-datorrenerako, zeneko-zenerako, gareneko-garenerako...

TZAT-TZAKO: – Niretzat-niretzako, inorentzat-inorentzako...
– Amatzat-amatzako, ontzat-ontzako, urretzat-urretzako...

XE-TXE: – Hola-holaxe, hala-halaxe, bezala-bezalaxe, berehala-berehalaxe, honela-honelaxe, horrela-horrelaxe...
– Hor-hortxe, hemen-hementxe, han-hantxe, orain-oraintxe, orduan-orduantxe, hartan-hartantxe, honetan-honetantxe...
– Hau-hauxe, hori-horixe, hura-huraxe, hari-harixe, horri-horrixe...
– Hauek-hauexek, horrek-horrexek, harek-harexek...

MEN-PEN-MENDU-MENDI: Adimen-adimendu, sentimen-sentimendu, begirapen-begiramendu, pentsamen-pentsamendu, hondamen-hondapen-hondamendi, kontsolamen-kontsolapen-kontsolamendu, itomen-itopen-itomendu-itomendi, urkapen-urkamen-urkamendu-urkamendi...

GANA-GANAINO: Guregana-gureganaino, horiengana-horienganaino, zuengana-zuenganaino...

TERA-TERAINO: Esatera-esateraino, izatera-izateraino...

TZERA-TZERAINO: Hiltzera-hiltzeraino, sartzera-sartzeraino...

RA-RAINO: Etxera-etxeraino, herrira-herriraino, zerura-zeruraino, gora-goraino, behera-beheraino, kalera-kaleraino...

TXO: Gauza bat-gauzatxo bat, hitz-hiztxo, haur-haurtxo, lagun-laguntxo, apur-apurtxo, pixka-pixkatxo, zerbait-zerbaitxo, borda-bordatxo, habia-habiatxo, pauso-pausotxo, egun-eguntxo...

ÑO: Gauza-gauzaño, hitz-hizño, haur-haurño, apur-apurño...

TSU: Berdin-berdintsu, hala-halatsu, honela-honelatsu, pare-paretsu, bezala-bezalatsu, gehien-gehientsu, onen-onentsu, igual-igualtsu...

TZA-TZEA: Bizitza-bizitzea, heriotza-heriotzea, ezkontza-ezkontzea, jaiotza-jaiotzea, oroitza-oroitzea...

(Atzizkia TZA ala TZE izan, alde horixe gertatzen da artikulua ezartzean: *Heriotza* + *a* = heriotza. *Heriotze* + *a* = heriotzea).

Z: Galduz-galduaz-galduez, ikusiz-ikusiaz-ikusiez, ibiliz-ibiliaz-ibiliez...

Z-N: – Onean-onez, txarrez-txarrean, indarrez-indarrean, negarrez-negarrean, zoritxarrez-zoritxarrean, zorionez-zorionean, beharrez-beharrean, aurrez-aurrean, ustez-ustean, kontuz-kontuan, gehienez-gehienean, gutxienez-gutxienean, umorez-umorean, gizonez-gizonean, luzez-luzean, trukez-trukean, hutsez-hutsean...

– Trenez-trenean, barkuz-barkuan, abioiz-abioian, zaldiz-zaldian, igandez-igandean, astelehenez-astelehenean, kotxez-kotxean, autoz-autoan...

– Gauez-gauean, egunez-egunean, bakez-bakean, katez-katean...

Z-TAN: Argiz-argitan, ilargiz-ilargitan, ilunez-ilunetan, urtez-urtetan, ustez-ustetan, kontuz-kontutan, gogoz-gogotan, astez-astetan, mendez-mendetan, zuriz-zuritan, bakez-baketan, ordez-ordetan, hutsez-hutsetan, penaz-penatan, nolaz-nolatan, inolaz-inolatan...

A: Pentsatu-pentsatua, ikusi-ikusia, egin-egina... eta aditz guztietan. Baliakizun hau amaigabea da eta balio handikoa. Zenbat aldiz ez da esan behar *pentsatu dut, egin dute, ikusi dugu, entzun dut* eta abar? Horiek guztiak berdin ondo daude honela: *pentsatua dut, egina dute, ikusia dugu, entzuna dugu* eta abar.

REN-N: Amaren-aman, herriaren-herrian, inoren-inon, alkatearen-alkatean, goikoaren-goikoan... (Hau berez laburduretan tokatzen da, baina hemen ere bego).

EI-ER-ERI: Zuei-zuer-zueri, denei-dener-deneri, haiei-haier-haieri, gizonei-gizoner-gizoneri...

DE: Gara-garade, zara-zarade, dira-dirade, ginen-ginaden, ziren-ziraden...

ERLATIBOA: Eman hitza-emandako hitza-emaniko hitza-ematen den hitza; nik egin lana-nik egindako lana-nik eginiko lana-nik egin nuen lana... (egiten dudan lana, egingo dudan lana... segun zer denbora dagokion).

E ARTIZKIA: Hona-honera, horra-horrera, hara-harera, hontan-honetan, hortan-horretan, hartan-haretan, hontaz-honetaz, hortaz-horretaz, hartaz-haretaz... Hola-honela, hala-harela, hola-horrela... Iruna-Irunera, Irundik-Irunetik, Irungo-Iruneko, Parisa-Parisera, Paristik-Parisetik, Parisko-Pariseko, Zarautza-Zarautzera, Zarauztik-Zarautzetik, Zarauzko-Zarautzeko...

Berdin kontsonantez amaituriko guztiak: Babel, Eibar, Gasteiz, Turin, Israel, Pekin, Arrangoitz, Bristol...

GAN-GANDIK-GANA-GATIK-KIN: Nigan-niregan, nigandik-niregandik, nigana-niregana, nigatik-niregatik, nikin-nirekin...

Berdin: zu-zure, gu-gure, aita-aitaren, nagusia-nagusiaren, hau-honen, hori-horren, hura-haren...

Azken atzizkiok genitibotik edo hitzetik zuzen ekar daitezke. Hitzetik zuzen eginiko batzu ez dira hain egokiak: *nikin, zukin, gukin*. Beste batzu oso desegokiak: *haukin* (*honekin* esateko, ez *hauekin* laburturik). *Horikin* (*horrekin* esateko). Honek esan nahi du genitibotik hartzea arau orokorragoa dela. Badaude hitzetik zuzen atereak bakarrik esaten direnak ere, *zergatik* adibidez. Baina hau, *zerengatik* esanik ere, ez dago gaizki hartzerik, *haukin* edo *horikin* bezala.

Artizki guztiok ikusi ondoren, milaka ariketa egin daiteke, milaka konbinapen posible baitago. Edozein bertsotan baliakizun hauetariko batzu ez agertzea harrigarria litzateke. Horrek esan nahi du baliakizun hauek neurriaren giltz handi bat ematen digutela. Jar dezagun adibide bat.

Bertso gaizki neurtua:

Hemen gara gu
kantuz alaiki
eseri baikara
zertako jaiki.
Hitz batez behar dut
zuzen ebaki
ez al gaude lanik
gabe hobeki?

Bertso bera ondo neurtua:

Hementxe garade gu
kantuan alaiki
eseriak baikara
zertarako jaiki.
Hiztxo batez behar dut
zuzenki ebaki
ez al gaude lanikan
gaberik hobeki?

Liburu osoa bete liteke honelako adibidez, baina hori ez da oraingo helburua. Hemen lanerako tresnak ematen ditugu. Ariketak egiteko materiala. Tresna hauek lantzea beste metodo bati dagokio. Horretan hasitakoan, bakarka nahiz taldeka ekin, berehalaxe ohartuko zarete neurgailu handi bat darabilzuela eskuetan.

# III
# HITZ ELKARTUEN EGITURA

Euskaraz hitz elkartuen egitura oso ugaria eta funtsezkoa da. Adibidez, *ibilpide* bi hitz elkarturik sorturiko hitza da: *ibili* eta *bide*. Sarritan bi hitzak elkartzean, hitz bakarra egiten dute: *herrialde, gizarte, artalde* eta abar. Beste askotan bi hitzek bereiz jarraitzen dute, bikotea eginik bezala: *etxe gaina, mendi gailurra, aker hatsa, diru hotsa...*

Non dago joko honen sekretua? Genitiboaren atzizkia jatean. *Etxearen gaina, mendiaren gailurra* esan beharrean *etxe gaina, mendi gailurra* egiten dute. Egitura hau, izan ere, genitibozko egitura baita. Lekuzko genitiboan ere berdin gertatzen da: *kanpoko jendea-kanpo jendea, herriko musika-herri musika* eta abar.

Egitura honetan aditzek euren atzizkia galtzen dute: *sorlekua, ikasgela, ikustokia...* eta ez *sortulekua, ikasigela, ikusitokia...*

Hitzek euren azken bokal organikoa galtzea ere normala da: *heriotza orduan-heriotz orduan, herrizain-hertzain, alabaorde-alaborde...*

Laburki esanik, hitz elkartuen egitura hitzari atzizki bat ezartzea bezala da. Atzizkia izan beharrean, hitza denean, hitz elkartuetan gabiltza. Hain zuzen, badaude hitz asko, era batera hitzak eta atzizkia direnak: *alde, aldi, buru, bide* eta abar. Atzizkitzat erabiltzen ez diren hitzak ere, analogiaz, era berdinean uztartzen dira: *mendi lurra, trumoi soinua, ardo botila, hil kanpaia...* Joko hau hitz guztiekin daiteke.

Esan dezagun azkenik bi hitz, genitiboz ala genitibo gabe elkartu, bi gauza ezberdin direla. Gauza bat da *zaldi gainean* edo *zakur antza* eta beste bat *zaldiaren gainean* edo *zakurraren antza*. Ez dago, beraz, zein dagoen ondo esaterik. Biak daude ondo, bakoitza bera tokatzen denan. *Zaldi gainean* gauza orokorra edo jenerala da, zein zaldi adierazi gabe. *Zaldiaren gainean*, ordea, zaldi mugatua edo konkretua da, artikulu mugatzailea horretarako baitarama. Beste gauza bat da biak nahastea eta horretarako erabiltzea. Orduan ez al dago bata nahiz bestea erabiltzerik? Horretarako balio izan ezik, alperrik ari gara. Baina ez. Gramatikaz ezberdinak izan arren, sarritan bata nahiz bestea erabiltzea berdin da. Edo, berdin-berdin ez bada ere, berdintsu behintzat. Esaterako, berdintsu da

norbaiti esatea: *hik zakur antza daukak* nahiz *hik zakurraren antza daukak* nahiz *hik zakurren antza daukak*, azken hau plurala delarik. Genitibo singularraren laburdura ere izan daiteke: *zakurraren antza* edo *zakurran antza*.

Jo dugu, beraz, beste giltz handi batera. Egitura bata ala bestea erabili, silaba baten edo biren aldea dago. Oso egitura ugaria eta euskararen funtsezkoa izanik, neurgailu handi gertatzen da. Goazen orain hitz zerrendak ematera.

## ADBERDIOAK

1) IZENEKIN: *Azpian, gainean, ondoan, alboan, aldamenean, inguruan, bueltan, ondoren, pean, artean, bitartean, aurrean, atzean, ostean, baitan, buruan, orduan, barruan-barnean-barrenean, goienean, bila, gisa, eske, moduan, bezala, lezlegez, antzean, aldean* (Gernikako aldean edo Gernika aldean), *gabe* (diru gabe edo dirurik gabe), *erdi* (mundu erdi edo mundurik erdi), *parean, alde, truke, ordez, bidez.*

2) ADITZEKIN: *Arte, artean, artio, bitartean, aurrean, aurretik, bezala, lezlegez, orduan, ala-ahala* (eginala, egin ahala), *arren, ezik, alde, ordez, aina, hainbat, beharrean-beharrez.*

## IZENAK

1) ATZIZKITZAKO HITZAK: *Alde, aldi, haro, arte, barne-barren, ahal, ezin, bide, buru, gabe, gale, gela, gose, gura, nahi, lagun, lan, leku, toki, min, poz, ondoren, ondo, talde, tegi, une, tresna, zale, zori, behar, denda.*

2) BESTE HITZ BATZU: *Antz, itxura, traza, tankera, usain, hats, kirats, gogo, azken, grina, kolore, kutsu, gailur, tontor, sail, multzo, gose, egarri, jario, ertz, txoko, bazter, era, modu, oin, garai, sasoi, giro, pila, pilo, fama, ospe, kontu, damu, mota, klase, irudi, falta, sobra, ordu, denbora…*

3) ADITZEKIN: *Zale, zaletasun, gogo, nahi, grina, ondoren, min, poz, toki, leku, modu, garai, giro, kontu, falta, behar.*

Hauek guztiak hiru eratara molda daitezke: *ikus zale, ikusi zale, ikusteko, zale; ibil nahia, ibili nahia, ibiltzeko nahia* eta abar.

Goazen orain adibideak jartzera:

Adberbioak izenekin: *Mahai azpian, kotxe gainean, plaza ondoan, eguzki pean, baso inguruan, gerri bueltan, lagun artean, leiho aurrean* eta abar.

Adberbioak aditzekin: *Ikusi arte-ikus arte, ekarri artio-ekar artio, ikasi bezala-ikas bezala, barkatu orduan-barka orduan, irentsi aina-irents aina, irakurri ezik-irakur ezik, salbatu beharrean-salba beharrean, anparatu bitartean-anpara bitartean…*

Atzizkitzako hitzak: *Gose aldia-gosearen aldian, lagun artean-lagunen artean, diru galea-diruaren galea, gaitz ondorena-gaitzaren ondorena* eta abar.

Beste hitzak: *On antza-onaren antza, gezur itxura-gezurraren itxura, hil usaina-hilaren usaina, mundu azkena-munduaren azkena, sagar mota-sagarren mota* eta abar.

Aditzekin: *Har nahia-hartu nahia-hartzeko nahia; zabal grina-zabaldu grina-zabaltzeko grina; ekar asmoa-ekarri asmoa-ekartzeko asmoa; erakus faltarik-erakutsi faltarik-erakusteko faltarik...*

Oro har, bikote gisa doazenean, hitz guztiek balio dute joko hau egiteko: *ikas usterik-ikasteko usterik ez du, etor denborarik-etortzeko denborarik ez nuen izan, ibil legerik-ibiltzeko legerik baldin bada* eta abar. Kasu hauetan, lizentziarik izatekotan, I edo TU atzizkia aditzari ez kentzea litzateke: *ikasi usterik, etorri denborarik, ibili legerik...* Forma hau gogor samar egiten da, baina lizentzia gisa pasa daiteke.

Badaude aditzak, ale bakarra egiten dutenak edo atzizkia kentzeko modurik ematen ez dutenak, eduki ere ez baitaukate: *bete, ase, jan, jo, egin, egon, esan, jasan, bota* eta abar. Hauei ez dago ezer kentzerik, baina hala ere bi aukera geratzen dira: *jan ordua-jateko ordua, egon lekua-egoteko lekua, eman garaian-emateko garaian, bota gura-botatzeko gura* eta abar.

Bertso neurketan zer egokiera daukan ikusteko, hona mila ariketa posibletariko bat:

Bertso gaizki neurtua:

Mahai gainean
da idazteko makina
sorgin antza dauka
horrela egina.
Banabil erosi arte
beste bat berdina
hor amaitzen da nire
diru grina.

Bertso bera ondo neurtua:

Mahaiaren gainean
da idaz makina
sorginen antza dauka
horrela egina.
Banabil eros arte
beste bat berdina
hor amaitzen da nire
diruaren grina.

Bertso gaizki nahiz ondo neurtuan, esaerak berdintsu naturalak dira, baina bigarrena ondo neurturik dago eta, tentelkeria bada ere, bertsoa da. Esan beharrik ez dago hankamotzak luzatzeko balio dutenek hankaluzeak mozteko ere berdin balio dutela. Bi silaba falta direnean, *mahaiaren gainean* kantatuko da eta bi sobra daudenean, *mahai gainean*. Batean zein bestean, joko bera da, alderantziz aplikatua.

# IV
# LABURDURAK

Beste sail mugagabe bat dator hemen: laburdurak edo kontrakzioak. Edozein hizkuntzatan sail handia bada, euskaraz askoz gehiago. Hizkuntza idatzia nagusitzen denean, hizkuntza mintzatua ere hartara makurtzen da gehienbat, baina, euskara bezala, oraindik hizkuntza mintzatua nagusi denean, laburdurak oihan trinko gertatzen dira. Hizkuntza mintzatua nagusi izatea erlatiboa da noski. Hizkuntza idatzirik eza hobeto legoke. Edo hizkuntza idatzi ahula. Hizkuntza idatzia edo hizkuntza literarioa berdin da. Euskaldun berri bati galdetzea besterik ez dago zer alde dagoen ikasi duen euskaratik hizketan entzuten duenera. Alde hori hizkuntza guztietan gertatzen baldin bada, euskaraz hainbat gehiago. Horri euskalkien arteko aldea eransten bazaio, pentsa nora goazen.

Hizkera literario indartsua eta hazia daukaten hizkuntzetan, idatzitik mintzatura dagoen aldea leundu egiten da. Euskarak badauka, bai, hizkuntza literarioa, baina ahula eta eragin gutxikoa oraindik. Eta gainera daukana ere euskalkietan banatua. Hortik dator laburdurek gure hizkuntzan hainbeste indar edukitzea. Gainera bertsolaritza hizkuntza mintzatuaren edo ahozko literaturaren alorrean batez ere dabilela, sail honek garrantzia handiagoa dauka. Garrantzia batetik eta neurtzeko bide handia bestetik, neurgailurik handienetarikoa izateraino.

Laburdurak esatean, luzadurak ere sail berean sartuko ditugu, hots, hitza laburtu barik luzatu egiten denean. Adibidez, *ziren* esan beharrean, *zirean*. Baina luzadurak oso gutxi eta garrantzi txikikoak dira laburduren aldean. Horregatik atal honi **Laburdurak** izena jarri diogu beste gabe.

Laburduretan badago kontuan eduki beharreko gauza garrantzitsu bat. Zenbait laburdura euskara osoarenak edo euskalki guztienak dira. Beste batzu euskalki batenak edo nahiko inguru zabalekoak, baina ez Euskal Herri guztikoak. Beste batzu, azkenik, lokalismoak dira, euskaldi beraren barruan ere inguru estuagokoak. Hauekin kontuz ibili behar da. Esan beharrik ez dago

ziurrenak euskara osoarenak direla. Inguru handia harrapatzen duten besteak ere ziurtzat erabil daitezke. Lokalismoak, ordea, toki hartatik kanpora oso arriskutsuak dira, entzuleengana ondo iritsi nahi bada behintzat. Zorionez, hemen jarriko ditugun gehienak euskara osoarenak edo inguru handikoak dira. Badaude lokalismoak ere, baina gutxi.

Lokalismoak leku batekoa esan nahi du. Leku hori, jakina, zabalagoa edo estuagoa izan daiteke. Hemen hartzen dugun barrutirik txikiena eskualde bat da, Bizkaiko Durangaldea, esaterako. Hortik behera badakigu herritik herrira, auzotik auzora eta ia etxetik etxera ere, euskara mintzatua lokalismoz josia dela. Baina hauek ez zaizkigu axola, lan zaila eta alperrekoa bait litzateke gure kasurako. Besteekin ere badaukagu nahiko arlo. Goazen, ba, laburduren bilduma ematera:

## ADITZ JOKATUA

1) **N, LA-ren aurretik E. Edo E gabe.**

– *Genuen, zenuen, gaituen, zuen, duen, gintuen, zituen, huen, nuen*... Edo: *genun, zenun, gaitun, zun, dun, gintun, zitun, hun, nun*... Berdin *genduen-genduan-gendun, nuan, zuan, gaituan, zituan*...

– *Nukeen, zukeen, nintekeen, dezakeen, legokeen, zenukeen*... Edo: *nuken, zuken, ninteken, dezaken, legoken, zenuken*... Beraz, KE + N = KEEN edo KEN.

– *Dakien, zekien, nekien*... Edo: *dakin, zekin, nekin*... Berdin *dakian, zekian*...

– *Duela, zuela, nuela, gaituela, zaituela, dagoela, zegoela*...

Edo: *dula, zula, nula, gaitula, zaitula, dagola, zegola*...

2) **Aditzerak eta atzizkiak**

TEKE-KE: *Nintzateke, litzateke, zinateke, lirateke, ginateke*...

Edo: *nintzake, litzake, zinake, lirake, ginake*...

ZKIO-ZKO-ZKA: *Zaizkio, dizkio, nizkion, genizkion*...

Edo: *zaizko-a, dizko-a, nizkon-an, genizkon-an*...

EZAZU-ZAZU: *Egin ezazu, ekar ezazue, har ezak*...

Edo: *egin zazu, ekar zazue, har zak*...

Beraz, inperatiboan, jokatzen diren aditzetan, lau forma posible daude: *Eman, emak, eman zak, eman ezak. Erran, errazu, erran zazu, erran ezazu.*

EGIN-EIN: Batez ere bizkaierazko aditz laguntzailean. *Dagidan, dagian, dagiket, legike*...

Edo: *daidan, daian, daiket, leike*...

EN-EAN: *Diren, ziren, garen, zaren, ginen, zinen*...

Edo: *direan-dirian, zirean-zirian, garean-garian, zarean-zarian, ginean-ginian, zinean-zinian*...

DE: *Garade, zarade, dirade, ziraden, ginaden, zinaden*...

DEZAKET-ZAKET, DEZADAN-ZADAN: *Dezaket, dezakek, dezake, dezakezu, dezakezue, dezakete, dezadan, dezaan, dezazun, dezaten*...

Edo: *zaket, zakek, zake, zakegu, zakezu, zakezue, zakete, zadan, zaan, zazun, zaten...*

Hauetariko batzu gutxi edo hutsa erabiliak dira, baina analogiaz aplikazio okerragorik egin liteke.

TE ken: *Daiteke, liteke, zitekeen, ninteke, hinteke...*

Edo: *daike, leike, zeikeen, neike, heike...*

A-I erants: *Nabila, dabila, habila, darabila, darabil(a)t. Goazi-goatzi, doazi-doatzi, zoazi-zoatzi...*

JOAN: *Noa, hoa, doa, zohan...* Edo: *nihoa, hihoa, dihoa, zihoan...*

Edo: *nijoa, hijoa, dijoa, zijoan...*

KI erants: *Daramat-daramakit, daramak-daramakik, daramagu-daramakigu, daramate-daramakite, neraman-neramakin-neramakien, zeraman-zeramakin-zeramakien...*

TZ-TZA: *Banintz-banintza, balitz-balitza, gabiltz-gabiltza, zabiltz-zabiltza, bagenbiltz-bagenbiltza...*

TEN-TZEN + D: *Esaten diot-esateiot, esaten diogu-esateiogu, esaten diote-esateiote, sartzen diot-sartzeiot, sartzen diogu-sartzeiogu, sartzen diote-sartzeiote...*

GO-KO + D: *Esango diot-esangoiot, esango diozu-esangoiozu, joko diot-jokoiot, joko diozu-jokoiozu...*

Beraz, TEN-TZEN edo GO-KO atzizkiekin D hizkiz hasten den laguntzaileari D horixe jatea da jokoa: *dut, duk, du, dugu, duzu, duzue, dute*. Eta hauen flexio guztiak: *diot, diok, diote, diozu, diguzu, didazu, didak, dizute, diete...*

DAU-EU bizkaieraz: *Emon dautzut-emotzut-emontzut, esan dausku-esausku-esasku, emongo dautsat-emongotsat, emon eutson-emontson, emoutson-emotsan, esan euskun-esauskun-esaskun, emongo eutsun-emongotsun...*

DO jan: *Ikusten dozu-ikustezu-ikustenzu-ikustozu, ikusiko dok-ikusikok, ikusiko dozue-ikusikozue, ikusi dozu-ikusizu...*

3) **Aditzak**

– *Eroan, joan, behar, itxaron...* Edo: *erun, jun, ber, itxain-itxoin-itxon...* Ikus beste aditz asko 5) zenbakian.

– ATU-AU: *Pentsatu-pentsau, kantatu-kantau, eskatu-eskau, kostatu-kostau, pentsatuko-pentsauko, kantatuko-kantauko, eskatuko-eskauko, kostatuko-kostauko...* Kasu honetan bizkaieraz euskaratik datozen aditzak edo, latinetik etorri arren, oso zaharrak direnak, ez dira laburtzen. Esaterako, *jorratuko, loratuko, parkatu, jokatuko, eskatu, urkatuko* eta gisakoek osorik behar dute, *jorrauko, lorauko, parkau, jokauko, eskau, urkauko* eta abar barik.

– TU ken: *Konparatu nuen, altxatu zuten...* Edo: *konpara nuen, altxa zuten...* TU kentzea potentzialean eta subjuntiboan arau da. Agian analogiaz beste batzutara ere lizentzi gisa pasatu da, baina ez da normal erabiltzekoa. Badaude aditzak, TU kendurik ere, erabili ohi direnak: *laga, para, errepara, pasa, altxa, kosta...*

– DU-TU erants: *Izan-izandu, egon-egondu, bizi-bizitu, ari-aritu, nabari-nabaritu*... Hauek ez dira asko, baina bai erabilera handikoak.

### 4) **Deklinabidea**

– GENITIBOA: *Amaren-aman, zakurraren-zakurran, herriaren-herrian, beraren-beran*...

– EAN-EN-IN: *Etxean-etxen-etxin, trenean-trenen-trenin, batean-baten-batin, lurrean-lurren-lurrin*...

IEN-IN: *Handiena-handina, gutxienez-gutxinez*...

OEN-ON: *Osoena-osona, ondoena-ondona, eroena-erona*...

UEN-UN: *Itsuena-itsuna, altuena-altuna, seguruena-seguruna*...

EEN-EN: *Maiteena-maitena, besteena-bestena, luzeena-luzena*...

IAN-IN: *Begian-begin, herrian-herrin, gorrian-gorrin*...

OAN-ON-UN: *Kanpoan-kanpon-kanpun, lepoan-lepon-lepun*...

UAN-UN: *Munduan-mundun, zeruan-zerun, zakuan-zakun*...

EAK-IAK-OAK-UAK = EK-IK-OK-UK: *Ateak-atek, begiak-begik, jokoak-jokok, munduak-munduk*... Laburdura hau toki batzutan pluralean bakarrik egiten da: *átek zabalik daude*, baina *ateak jo nau*. Beste toki batzutan azentuak bereizten ditu singular-pluralak: *átek zabalik dagoz-átik zabalik dagoz* eta *aték jo nau-atík jo nau*.

– AGO-GO-O: *Gehiago-gehigo-gehio, handiago-handigo-handio*...

Lokalismo arriskurik handiena zenbaki honetantxe dago, deklinabidean alegia. Genitiboaz beste laburdura guztiak nahiko lokalismo mugatuak dira, euskalki bat beraren barruan ere ezberdin egiten direnak. Argi, beraz, non erabiltzen diren.

## B-D-G-R KONTSONANTEAK

Kontsonante hauexek ematen dute laburduretan sail nagusia eta giltzik garrantzitsuena. Hizki hauek jatea euskalki guztietako araua da. Arau orokorra, beraz. Eta ugaritasunean zer esanik ez, letra horietako baten bat daramaten hitzak milaka eta oso garrantzizkoak baitira. Ea nola ordenatzen dugun oihan amaigabe hau.

### A) **Bokal berdinen bitartean**

A-A: *Akabatu-akatu, pagatu-patu, preparatu-prepatu, ikaratu-ikatu, arazi-azi, arazo-azo, bada-ba, daramazu-damazu*... E-E: *Ere-e, bere-be, beretu-betu, fereku-feku, debekatu-dekatu*... I-I: *Eskribitu-eskritu, errezibitu-errezitu, higitu-hitu*... O-O: *Zorotu-zotu, txorotu-txotu*... U-U: *Burutu-butu*...

Hauetan denetan gertatzen dena da, kontsonantea jatean, bi bokal berdinek bat egiten dutela. Gehienean, ordea, ez da bokal normala, apur bat luzatua baizik: *akátu, pátu, dámazu, dékatu, eskrítu, txótu, bútu*... Baina bertsotan silaba bat ala bi egin behar dira, neurrian sartzeko. Ez dago hizketan bezala bien bitartean geratzerik. Adibidez, puntu hau zortziko txikian jartzean:

Noiz patuko didazu
ostu zenidana?

Edo:

Noiz paatuko didak
ostu didakena?

Lehenengoan laburdura egin da. Bigarrenean bi silaba kantatzen dira, baina G janda. Edo behintzat duda handia geratzen da kontsonante hori ahozkatu den ala ez.

B) **Bokal ezberdinen artean**

A ATZETIK DELA: *eraman-eaman, zeraman-zeaman, Zegama-Zeama, ailegatu-aileatu, geratu-geatu, aprobatu-aproatu, loratu-loatu, zoratu-zoatu, inguratu-inguatu, mugatu-muatu, ugazaba-uazaba, oratu-oatu, berak-beak, eurak-eak, norberak-norbeak, dira-dia, balira-balia, fidatu-fiatu...*

Hemen, arteko kontsonantea jan arren, bi silaba geratzen dira, EA-IA-OA-UA diptongo hautsiak baitira. Baina diptongo edo silaba bakarra egiteko bidea ere geratzen da, guztiz egokokia ez bada ere. Gertatzen dena, kontsonantea jandakoan, gero sarritan beste laburdura bat etortzen dela, bokal batek bestea irentsirik edo bazterturik: *ailegatu-aileatu-ailatu, geratu-geatu-gátu, ugazaba-uazaba-uzaba, eurak-eak-ek...* Kontsonantea jatea arau orokorra bada, hortik aurrera zer egiten den, lokalismo kontua da. Toki batzutan *eurak*, beste batzutan *eak*, beste batzutan *ek*. Arau orokorra esateak ez du denean egiten denik edo egin behar denik esan nahi, toki guztietan lau kontsonante horiek jatea normala dela baizik. Hitz batzutan ez bada, beste batzutan.

E ATZETIK DELA: *gabetu-gaetu, bagetu-baetu, baretu-baetu, paret-paet, paretik-paetik, iretargia-ietargia, hobeto-hoeto, lore-loe, halare-halae, jabetu-jaetu, aldaretik-aldaetik, urkabera-urkaera, abildade-abildae, aginpidetik-aginpietik, amore-amoe, dotore-dotoe, gobernadore-goernaore, zure-zue, suge-sue...*

Hemen ere goragoko bera tokatzen da, hots, kontsonanteak jan arren, AE-IE-OE-UE diptongo hautsiak dira eta bi silaba. Neurri kontuan, beraz, lehenean geratzen gara, silaba bakarra egitea nabarmentxo gertatzen baita.

I ATZETIK DELA: Hauxe da kasurik ugariena eta gehien axola zaiguna. Zergatik? Arteko kontsonantea jatean, beste gabe diptongo bilakatzen delako. Silaba bat, beraz. AI-EI-OI-UI beti diptongoak edo silaba bakarrak dira.

*Aditu-aitu, kabitu-kaitu, adina-aina, aritu-aitu, agindu-aindu, nabaritu-nabaitu, adizu-aizu, hadi-hasi, dadila-daila, baditu-baitu, zartagi-zartai, buruzagi-buruzai, bertsolariak-bertsolaiak...*

*Begiratu-beiratu, segitu-seitu, begitu-beitu, medio-meio, erremediorik-erremeiorik, kreditu-kreitu, mediku-meiku, aurpegi-aurpei, eskegi-eskei, gehiegi-gehiei, larregiu-larrei, komediak-komeiak, huskeriak-huskeiak...*

*Loditu-loitu, erori-eroi, zerori-zeroi, horiek-hoiek, mogitu-moitu, goritu-goitu...*

*Mugitu-muitu, zuritu-zuitu, isuri-isui, iruditu-iruitu, urduritasun-urduitasun, jakinduria-jakinduia, guri-gui...*

Hitz batzutan bi tokitan labur daiteke. Esaterako:

*Begiratu-beiratu-beiatu-beatu.*

*Erori-eroi-eoi.*

*Erremediorik-erremeiorik-erremeioik.*

*Zerori-zeroi-zeoi.*

Bitik bat egitekoan, lehentasuna I-rena da, hau atzetik denean. Esaterako, *begiratu*. Bat beharrean, *beiratu* eta ez *begiatu*. Zergatik? E-I askoz elkarkoiago direlako I-A baino. Hain elkarkoi, non EI silaba bakar gertatzen baita. IA, ordea, diptongo hautsia da, bi silaba dauzkana.

O ATZETIK DELA: *Itxaron-itxaon, egon-eon, zegon-zeon, dago-dao, berotu-beotu, igon-ion, igo-io, fido-fio, espero-espeo, gero-geo, trago-trao, balego-baleo, gizonago-gizonao.*

Hauetan ere, kontsonantea jandakoan, laburdura gehiago gerta liteke: *gehiago-gehigo-gehio, itxaron-itxaon-itxon, egon-eon-on, dago-dao-do, gizonago-gizonao-gizono.*

U ATZETIK DELA: *Eduki-euki, ezagutu-ezautu, ezagun-ezaun, dezagun-dezaun, lagunak-launak, degu-deu, dogu-dou, diagu-diau, dakigu-dakiu, diogu-diou, dezakegu-dezakeu, bizimodua-bizimoua, korupean-koupean, soseguz-soseuz, daukagu-daukaun, etxaguna-etxauna, herenegun-hereneun, astegunak-asteunak, bigun-biun.*

U atzetik dela ere asko axola zaigu, diptongoa edo silaba bakarra egiten baitu, IU denean izan ezik. I eta U atzetik direnean, beti dira diptongo, elkarrekin I aurretik izan ezik. IU bi silaba, baina UI bat. Horrek esan nahi du I jaunago dela U baino.

Sail hau bukatzeko, neurriari dagokionetik, arteko kontsonantea janda, silaba bakarrera datozenak hauek dira: AI, EI, OI, UI eta AU, EU, OU. Beste guztiak, kontsonantea janda ere, bi silabatan geratzen dira: EA, IA, OA, UA; AE, IE, OE, UE; AO, EO, IO, UO. Bokal berdinen arteko kontsonantea jatean ere, silaba bakarrera datoz, A) atalean azaldu bezala.

Badago egin beharreko ohar garrantzitsu bat. Ez dauka eragin berdina, laburdura hitzaren erdian ala azkenean egin. Esaterako:

Euskal Herrian bazen
hamaika erromei

Edo:

Oso emanak gaude
erromeietara.

Bigarrenean lehenengoan baino askoz gutxiago nabari da laburdura. Izan ere, laburdura zerbait jatea baldin bada, tranpa egitea bezala baldin bada, ertzean baino erdian gutxiago igarriko da, alde bietatik babesturik baitoa. Adibide bat jartzeko, soka dantzan edo korru dantzan, aurreskuak edo atzeskuak huts egiten badu, nekez pasako da gordean, biak sokaren ertz baitira. Norbaitek erdian huts bera egin arren, ordea, lasaiago ibil daiteke.

Era berean, ez da berdin laburdura hitz luzean ala laburrean egin. Bi silaba baizik ez dauzkan hitzari, laburdura eginez, bat jaten bazaio, silaba bakarrean geratzen da. Erdia galtzen du. Lau dauzkanari ordea, bat jan arren, hiru geratzen zaizkio eta hitza nahiko adierazita geratzen da. Zenbat eta hitz laburragoa izan, arrisku handiagoa dago bi gauza gertatzeko. Batetik hitzaren beraren informazioa galdu eta beste hitz batzuekin kointzidentzia eta nahasmena sortu.

Esate baterako, *gari* hitza kantatzean, *gai* esaten bada, beste hitz oso ezagun bat bilakatzen da. *Segi* laburturik *sei*. Zenbakia. *Pagatu* laburturik *patu*. Hitz hau berdin izan daiteke *paratu*-ren laburdura. Badago beste hitz bat, *patu*, destinoa edo fatalitatea esan nahi duena.

Kontestuak, jakina, nahastea ken lezake. Baina hitz batean ez ezik, hitz askotan gauza bere egiten bada, zailago da argitasunari eustea, batez ere laburduren egikeran lekutik lekura alde handiak baitaude.

Esan beharrik ez dago hitzaren luze-laburrean deklinabidea eta atzizkiak ere sartzen direla. Ez da berdin *segi* ordez *sei* esan ala *segituan* ordez *seituan*. Ez da berdin *zer patu* (pagatu) esan ala *ez dut patuko*. Bigarren kasuan hitza aditza dela argi dago eta *patu* edo destinoa berez baztertzen da. Beraz, deklinabidea ere hitzaren osagai da eta informazioa gehitzen du. Bestalde, arau hau hizkuntza mintzatuak ere errespetatzen duena da neurri handi batez. Errezago esango da *patu zazu hoi, pa zazu hoi* baino. Batean *patu-pagatu* da eta bestean *pa-paga*.

Laburduren sail agorkaitz honetako ariketa bat jartzeko, nondik hasi pentsatzen ere badago lana, alor amaigabeak baitaude. Jar dezagun, hala ere, adibide posible horietariko bat, ohiturarik ez galtzeko:

Bertso gaizki neurtua:

Zertan ari gara hemen
komediante gisan
iruditzen zait hau hola
ez daitekeela izan.
Egin dezagun dakiguna
hitz tontorik ez esan
egiari eusten dionak
lana eduki dezan.

Bertso bera ondo neurtua:

Zertan ai gara hemen
komeiante gisan
iruitzen zait hau hola
ez daikela izan.
Ein zagun dakiguna
hitz tontoik ez esan
egiai eusteionak
lana euki dezan.

# V
# ELIPSIA

Elipsia zerbait ezabatzea edo ulertutzat ematea da. Zerbait hori hitz bat edo gehiago izan daiteke. Baita esaldi osoa ere. Hona adibide bat elkarrizketan:

– Kaixo, zer moduz?
– Ondo. Eta hi?
– Ni ere ondo. Nora?
– Mendira.

Elkarrizketa hau honela litzateke osorik:

– Kaixo, zer moduz habil?
– Ni ondo nabilek. Eta hi zer moduz habil?
– Ni ere ondo nabilek. Nora hoa?
– Mendira nihoak.

Ikusten denez, lehenengoa hainbat hitz janda dago. Elipsia edozein hizkuntzatako tresnarik handienetakoa da, ugari erabilia. Euskarak ba al dauka horretan berezitasunik? Sakonegi jo gabe –horretarako ez bait naiz gai ere-, baietz esango nuke. Euskararen berezitasuna, gaztelaniarekin konparaturik behintzat, elipsia ugariago eta errezkiago egitean legoke. Sarritan, filmeetan, indioen hizkera elementala imitatzean, gaztelaniaz honelakoak jartzen dituzte:

– Indio jefe no querer. Indio querer libre. Indio no necesitar dinero. Querer tierra y libertad.

Hizkera honek, euskaraz hitzez hitz jarririk, askoz naturalago emango luke. Aditza infinitiboan dela, euskaraz era horretako esaldiak, hizkera normalean ere, ugari erabiltzen dira. Euskarara itzultzean, indioen hizkera hori beste era batera azaldu beharko litzateke.

Bertsolaritzari dagokionez, elipsia hizketan baino askoz gehiago erabiltzen da. Neurri batzutan batez ere, ez dago bertsotan egiterik elipsi gabe. Hona Xenpelarrek betroi zaharrari jarritako bertso sortatik lehenengoa:

Mila zortzirehun eta
hiruroita bian
bertso bi jarritzeko
nua abian.
Betroi bat hartu nuen
Hernanin ferian

galantzia egingo
nuela agian
beti ahulerian
tristura begian
ez haren premian
nere familian
Xenpelarrek daukazki
Errenterian.

Erdiko lau puntu jarraiko horiek elipsi hutsez eginak dira: *beti ahulerian, tristura begian, ez haren premian, nere familian.* Aditz guztiak falta dira hor: *beti dago (dabil) ahulerian, tristura dauka begian, ez gaude haren premian nere familian.* Edozein bederatzi puntukotan, lau puntu horiek elipsi gabe jostea oso kasu bakana izango da. Oro har, edozein bertsotan elipsi ugari aurkituko duzu, batez ere puntu laburrak direnean, edo hitz gutxitan asko esan nahi denean. Alderantziz ere gertatzen da, hots, esankizunik ez eta bertsoa bete egin behar. Orduan jokoa alderantziz egitea da. Elpisia akordeoia ixtea bezala da eta betelana hura zabaltzea bezala.

Euskararen berezitasuna, bertsoan ez ezik, hizketan ere elipsia oso samur gertatzean dago. Ba al dago arrazoi berezirik? Horretara goaz.

## ADITZAREN BEREZITASUNA

Hizkuntzaren bizkarrezurra aditza bada, euskaraz ez gaude horren faltan, bizkarrekoak hartzeko bada ere. Mundu guztiak daki euskal aditzaren hedadura eta nahasitasun mugagabearen berri. Bi gauza handi gertatzen dira euskaraz:

1) Alde batetik bi aditz mota daude, *nor-nori* eta *nork-nori-nor.*

Transitiboak eta intransitiboak. Aditz mota horiek gaztelaniaz ere badaude, baina ez da *nor* ala *nork* berezten. Ez eta aditz laguntzaile ezberdinik ere erabiltzen. *Yo he ido* esaten bada, *yo he traído* ere berdin esango da. *Yo* eta *he* ez dira aldatzen. Euskaraz ordea, bata da *ni joan naiz* eta bestea *nik ekarri dut. Ni-nik* eta *naiz-dut.*

Subjektua esatean, beste gabe aditz mota bat adierazten dugu euskaraz. Aditzak bi sail handitan baldin badaude, subjektua izendatzeak sail handi horietako batera garamatza, beste saila bat-batean alboraturik. Adibidez *zuk zer* ala *zu zer* galdetzean, bide erdi egina dugu. *Zuk zer* galdetzean, badakigu *egiten duzu, nahi duzu, diozu* edo horrelako aditzen bat dela. *Zu zer* galdetzean, ordea, badakigu *zer zara* edo horrelakoren bat dela.

2) Beste aldetik, euskal aditzak bere barruan darama zenbait osagai: *nor-nori* edo *nork-nori-nor.* Eta gainera singularra ala plurala den ere aditzean adierazten da. Gaztelaniaz jar dezagun *yo te lo he dado.* Euskaraz *nik eman dizut.* Eta plurala balitz, *nik eman dizkizut* (yo te los he dado). Gaztelaniaz aditzak subjektua bakarrik adierazten du. Bestela *he* aditz hori beti da berdina: *yo se lo he dado, yo os lo he dado* eta abar. Beste era batera esanda, gaztelaniaz *he* esatean,

subjektua bakarrik dakigu: *yo*. Baina ez dakigu ez nori ez zer, ez singularrik ez pluralik. *Dizut* esaten ordea, beste gabe dakigu *nik zuri* eta *zer singularra* dela. *Dut* esatean, badakigu *nik* eta *zer singularra* dela eta ez dagoela *nori*-rik.

Euskal aditzaren berezitasun nabarmen honek elipsiak egiteko ere erreztasun handia ematen du. Esaldiko osagai nagusiak berriro aditzean adierazirik badatoz, osagaiak kendu arren, aditzak ematen ditu. Edo alderantziz, osagaiak ematen badira, aditza ken daiteke. Adibidez:

– Jipoi ederra eman dizut.

– Zuk niri? Neuk dizut, adiskide.

Bigarren esaldian, *zuk niri* galderan, *jipoi ederra eman didazula* janda dago. Hurrengo esaldian, *neuk dizut, adiskide* horretan *jipoi ederra eman* janda dago.

Sarritan, aditza ezabatzean, denbora airean gera daiteke. Beste osagaiak han baldin badaude, denbora kontestuak ematen du gehienean. Gainera denbora adierazteko hitzak ere badira: *lehen, atzo, gero, bihar, antzina, orain, gaur* eta abar.

## ADITZ LAGUNTZAILEA

Arau orokorretatik zerbait konkretuagora jorik, aditz laguntzailea errez kentzekoa izaten da. Errezen laguntzaile intransitiboa edo IZAN jaten da: *hi lapurra, handia beti astun, zakur gosea negarti, lagura laneroko txarra* eta abar. Laguntzaile intransitiboa errezen kentzekoa izatea bidezko da, sinpleena edo osagairik gutxien daukana baita.

Laguntzaile transitiboa ere aisa ken daiteke. Esaldiaren elementuak adierazirik badaude, hura kentzeak ez dakar galerarik. Adibidez: *Nik panderoa ederki jotzen; azeriak oiloa nahi; gezurrak ibilpide motza, egiak motzago; nahi dena pentsatu, ahal dena egin* eta abar. Aditz nagusia bera jatea sarritan ezinezkoa da, huraxe adierazi behar baita. Adibidez *azeriak oiloa* bakarrik esaten baduzu, norbaitek galde diezazuke:

– Azeriak oiloa zer? Jan, eraman, harrapatu, nahi, amets egin ala zer?

Badaude aditzak, nagusiak izanik ere, errez jatekoak, oso maizkorrak eta arruntak direlako: *egon, ibili, eduki, egin, joan* eta abar. Gehien agertzen direlako, errezen kentzekoak. Beraz, alde bietatik baliosak elipsi konturako. Adibidez: *gu hemen ederki* esatean, beste kontesturik ez bada, *gaude* edo *gabiltza* dago janda. *Lapurrak azken txarra* esatean, *dauka* dago jana. *Gaur bizimodua beltz* esaldian *dago, daukagu, dabil. Han ere zakurra ortosik* badiot, *dabiltza* edo *daude. Astoak arrantza* badiot, *egin, egiten du*.

## ADITZA PARTIZIPIOAN

Laguntzailea kentzea erreza bada, aditza partizipioan uztea beste gabe egoki dela esatea bezala da. Gaztelaniazko infinitiboaren parekoa. Adibideak: *ibili eta ikusi; txapela jantzi eta ibili; hartu eta jan; joan eta ikusi; munduan bizi; lehenbizi jakin eta gero hitz egin…*

Badirudi hauek inperatibo tankera ere badaukatela. Nondik dator, ba, euskaraz inperatiboaren era bat aditz partizipioa bera edo intenporala izatea? Badu

esaten ari garenaz zerikusia. Esaldi hauek orokorrak ziren, osagai denak izendatu gabe. Osagaiak izendaturik, hots, *nor-nork-nori* jarririk, hainbat hobeki: *guk ematen digutena hartu; nik denak izorratu; nik atera eta zuk ordaindu; gazteak jolastu*...

## ATZIZKIAK

Gorago aipaturiko aditz oso maizkor horiek gehienean euren inguruko atzizkiak dauzkate. Adibidez, *egon* eta *ibili* gehienean *non* edo *zertan* dira. *Joan*, ordea, *nora, zertara*. *Etorri* azkenik *nondik, zertatik*. Beraz, horrelako atzizki bat agertzen denean, ia aditza ere gainulertzen da. *Etxera, kanpora*... esaten bada, gehienean *joan* izango da. *Etxetik, herritik* baldin bada, *etorri* izango da. *Non, herrian, etxean* izendatu bada, *egon* izango da.

Arau hau nahiko erlatiboa da. *Egon* izan daiteke *nondik*, berdin *etorri* ere *nora* eta *joan* izan daiteke *non*. Baina gehienean eta kontestu barruan, aditz horiek jateko, ez da motibo handirik behar. Adibidez:

– Zer egin behar duk?

– Laster etxera.

Erantzun horretan ez dago *joan* esan beharrik, *etxera* hitzak adierazten baitu.

– Zer egin behar duk?

– Laster etxea...

– Laster etxea?

– Laster etxera esan nahi diat.

– Ah!

Pentsa *etxea* ala *etxera* esan, zer alde dagoen, batean ere aditzik esan gabe.

## KONTESTUA

Esan beharrik ez dago hizkuntzan kontestua oso behina dela. Honek sarritan elipsiak berez ekartzen ditu. Esaldi solteetan gaizki daudenak hizketan edo kontestuan ondo daude. Kontestu gabe hitz egiterik edo idazterik ez dago. Banaka esaldi galduak dirudítenak kontestuan ondo egokitzen dira.

– Olioa dendan.

Esaldi honek, erosketak egiten ari naizela, olioa dendan *erosten* dela edo horrelako zerbait esan nahi izango du. Eskasiaz edo krisiaz ari garenean, ordea, esaldi berak olioa dendan *dagoela* esan nahi du. Hots, etxean ez dagoela edo falta dela. Kasu batean, beraz, *olioa dendan egon* eta bestean *olioa dendan erosi*.

– Gizona kalean.

Esaldi honek gauza asko adieraz dezake: *abandonaturik, mozkorturik, bizi, egon, ikusi* ... kontestuaren arabera.

## ESALDI-ESAERAK

Azkenik, esaldi batzu esaera antzeko izan ohi dira. Aditz jakin bat nahiko inguruan daramate, izendatzen ez bada ere. Esaldi eginak bezala dira, ia esaerak. Zergatik? Elementu horiek bata bestearekin loturik daudelako edo hala ohiarazi ditugulako. Adibidez, *makilaz burutik* esatean, badakigu *jo* edo *eman* edo horrelako zerbait izango dela. Ez da *makilaz burutik laztandu* izango. *Berritsuak gezur asko*. Hemen *esan, asmatu, kontatu* edo gisako bat falta da. *Euria goitik behera*. Badakigu *erori* edo *etorri* edo *ari* izango dela.

Antzeko beste esaera batzu: *buru handian huts handiak; ogia gariz; hil kanpaiak tristura; astoak mandoari belarrihandi*; eta abar. Beste batzutan hitz batek aditz konkretu bat adierazten du: begiak *ikusi*, suak *erre*, kanpaiak *jo*, bihotzak *sentitu* eta abar.

Laburpen gisa esan dezagun euskaraz elipsia oso ugaria eta erreza dela, batez ere aditz laguntzailearena. Aditz nagusietan ohikoenak eta erabilienak kentzea ere oso naturala da. Alderdi honek bertsotarako garrantzi handia dauka, bai neurrirako, bai bertsoaren egiturarako. Hona Xenpelarren bat:

Ezkondu eta ezkongai
guztiok ondo bizi nahi
dirua dagonian jai.
Familiako buruzagiak
kalte gehiago ere bai
lehenago ardo edan lasai
orain urrutitik usai
etxian nago andrezai.

Bertso guztian aditz nagusi bakarra dago, azken lerroko *nago*.

Sail hau amaitzeko, esan dezagun euskararen elipsirako erreztasuna hein handi batez premiak eragina dela. Honek esaldia laburtzeko erak asmarazi dizkigu, gero erabilerak guztiz natural bihurtu dituelarik. Aditzaren barruan subjektua, datiboa eta konplementua adierazteak elipsibide handia dakarrela argi dago, azaldu dugun bezala. Baina baita argi dago euskal aditza, gehiena perifrastikoa edo aditz laguntzaileduna izanik, asko luzatzen dela. Ondorioz, bertsotan bezala, espazio mugatua dagoenean, –eta neurri laburretan oso mugatua-, ez dago elipsiaz beste erremediorik. Gaztelaniaz *pensais, vendrán, cambiarían, terminé, dimos, verían, controlo, bebían, canto*... Euskaraz *pentsatzen duzue, etorriko dira, aldatuko lirateke* edo *aldatuko lukete-lituzkete, amaitu nuen-nituen, eman genuen-genituen, ikusiko lukete-lituzkete, kontrolatzen dut-ditut, edaten zuten-zituzten, kantatzen dut-ditut*...

Gainera euskaraz aditz asko berez ere bikoitzak dira: *gorroto ukan, egarri izan, barre egin, arnasa hartu* eta abar. Hauei aditz laguntzailea eranstean, forma luzeagoak irteten dira. Gaztelaniaz *llorais, respiraría, lo odié, huyeron, querreis, convendría*... Euskaraz *negar egiten duzue, arnasa hartuko nuke, gorroto ukan-izan nuen, ihes egin zuten, nahi izango duzue, komeni izango litzateke*...

Aditza osorik esatekotan, sarritan berak beteko luke bertsoaren espazio guztia edo gehiena. Eta batzutan gainez egiten du. Horrek elipsia nahitaez aplikatu beharra dakar.

# VI

# DIPTONGOAK ETA DIPTONGO HAUTSIAK

Diptongoak bi bokaleko bikoteak dira: AI, OI, UA, EA eta abar. Bikoteok silaba bakarra edo bikoitza egin dezakete. Zeintzu dira diptongoak edo silaba bakarrak eta zeintzu silaba bikoitzak edo diptongo hautsiak?

Gai honek garrantzi handia dauka bertsotarako. Beharbada hau, ikusten ari garen neur-giltza baino areago, neurriaren muga edo baldintza litzateke. Aukera baino gehiago araua. Gaztelaniaz eta euskaraz diptongoak ez dira berdin. Gaztelaniaz *io, ia, ie, iu*, adibidez, diptongoak dira beti, I-ren gainean azenturik ez badaramate: *lección, ocasión, gracia, tienen* eta abar. *Ción, sión, cia, tie* silaba bakarrak dira eta ez *ci-ón, si-ón, ci-a, ti-e*. Diptongo hori hausteko, azentua behar da: *rocío, manía, bravío*.

Euskaraz, ordea, IA, IE, IO, IU dira hain zuzen diptongo izateko uzkurrenak. Hauek beti dira diptongo hautsiak edo silaba bikoitzak. Gaztelaniaz: *o-ca-sión, pa-sión, me-dio*. Euskaraz: *o-ka-si-o, pa-si-o, me-di-o*.

Bertsotan erdaratiko hitzak ez baitira gutxi erabiltzen, arau hauek ondo erabiltzea komeni da. Berdin euskarazko hitzetan ere. Bi bokalek diptongoa bi eratara egin dezakete: hitzaren barruan eta hitzetik hitzera. Hitzaren barruan: *eutsi, daukagu, diona* eta abar. Hitzetik hitzera: *bete arte, bota inoiz, jaiki omen*. Hauetan hitzetik hitzerako zubia da. Lehenengoa bokalez amaitzen da eta bigarrena bokalez hasten. Azter ditzagun bi kasuok banaka.

## HITZ BARRUAN

Hona arau nagusia: I eta U atzetik edo bigarren direnean, beti da diptongo, euren buruekin izan ezik. Hau bidezko da, zeren ez luke zentzurik II edo UU izanik, I edo U esatea edo diptongotzat hartzea. Hitz barruan horrek ez dauka funtsik. Beste gauza bat da hitz batetik bestera, geroago ikusiko dugunez.

Beraz, I edo U bigarren direla, beti diptongo. Salbuespen bakarra U aurretik I denean. Orduan ez da diptongoa, diptongo hautsia baizik: I-U. Horrek esan nahi du, biak elkarrekin batzean, I dela nagusi.

Beste kasu guztiak diptongo hautsiak dira.

Diptongoak: AI, EI, OI, UI eta AU, EU, OU.

Diptongo hautsiak: EA, IA, OA, UA; AE, IE, OE, UE; AO, EO, IO, UO. Eta IU.

Diptongoak: *Hau-tsi, sei-an, gai-tu, gaur, hau-rrak, sa-soi-a, i-jui-ka, geu-re, a-rau-tu, bal-koi, hau-ei, bei-ra, Gas-teiz, Za-rautz.*

Diptongo hautsiak: *A-te-a, ze-ha-tu, be-gi-a, ba-li-a-tu, ko-me-di-an-te-a, e-ro-a, ko-ro-a, mun-du-a-ri, zai-e, ge-ni-en, o-he, zai-zu-e, le-hoi, da-ri-o, o-ka-si-o-an.*

Gaizki ebakirik: *o-ka-sio-rik, ma-i-tea-ren, kan-bio-a, be-gie-ta-tik, ga-ur, o-ra-in.*

I eta U bokal bereziak eta kideak direla ikusteko, hona bi xehetasun gehigarri. Ez dago hiru bokalez silaba bakarrik ahozkatzerik, I edo U ertzetan direla izan ezik. Daitekeena da *iai, uau, ieu, uou, uoi* eta abar silaba bakar bezala ahozkatzea. Beste hauekin, ordea, hori inola ere ezin da, gure hizkuntzan behintzat: *aea, oia, eio, uae, aue* eta abar. Hirukote hauek nahitaez honela ahozkatu behar dira: *ae-a, oi-a, ei-o, ua-e, au-e.*

I edo U ertzetan dauden hirukoteak hiru letrakoak al dira benetan? *Iai, uau, ieu* eta horien lehen I eta U hain bokal zehatzak eta garbiak al dira? Hain zuen, bi bokalok atzeko bokalari, hizkuntza mintzatuan, halako zerga edo zama uzten diote. Toki askotan *begia, balio, dakien* honela ahozkatzen dituzte: *begija, begiya, begixa; balijo, baliyo, balixo; dakijen, dakiyen, dakixen.*

U-ren kasuan, zenbait lekutan, *mundua, duen, inguruan* honela ahozkatzen dituzte: *munduba, duben, inguruban.* Bokal honek I-k baino askoz gutxiago eragiten du fenomeno hori. Hortik ateratzen da, berriz ere, euskaraz bokalik bereziena eta harroena I dela.

## HITZETIK HITZERA

Hitz bat bokalez amaitzen eta hurrengoa bokalez hasten denean, bi bokal horiekin silaba bakarra edo diptongoa egin ala ez, hori da oraingo auzia. Adibidez: *dezala inoiz, daukate ogia.* Dauden bezala uztea zilegi da, jakina. Baina hau ere egin daiteke: *de-za-lai-noiz, dau-ka-teo-gi-a.* Honela silaba bat gutxiago geratzen da. Noiz eta nola daiteke lotura hau?

1) Dudarik ere ez, hitz barruan diptongo egiten zuten bokalak tokatzen direnean, bat egitea naturalena da. *Daukana ikusten, dago inbiditan, duzu, ikusten, hamaika urte* edo *dau-ka-nai-kus-ten, da-goin-bi-di-tan, du-zui-kus-ten, ha-mai-kaur-te.*

2) Bokal berdinak bat egitea ere egoki da hitzetik hitzera. *Ari izaten, eduki inola, dezala anpara, balego ogirik, daukate etxean, zaigu ustela* edo *a-ri-za-ten, e-du-ki-no-la, de-za-lan-pa-ra, ba-le-go-gi-rik, dau-ka-te-txe-an, zai-gus-te-la.* Hitz barruan bat egite honek ez luke zenturik. Hitz bati zertarako jarriko zaizkio bi bokal, gero bakarra egitekotan?

3) Beste guztietan ere, hitzetik hitzera, bi bokalekin diptongo egitea ez dago gaizki. *Daukate orduan, daude ateak, daukagu ondo, espero argirik, dezala eten* edo *dau-ka-teor-du-an, dau-dea-te-ak, dau-ka-guon-do, es-pe-roar-gi-rik, de-za-lae-ten.*

Ditpongo egiteko, I eta U bigarren izatea onena baldin bada, lehenengo direnean gertatuko da gogorren. Hitz barruan IA, IE, IO, IU eta UA, UE, UO derrigor diptongo hautsiak izan behar dutela bagenion, hitzetik hitzera ere, diptongo egitekotan, hauexek izango dira gogorrenak. Adibidez: *badaki orduan,*

*ikusi aterik, baleki ematen, bedi urtebete, digu arima, gaitu eraman, geratu orduko.* Hauek ere egin daitezke honela: *ba-da-kior-du-an, i-ku-sia-te-rik, ba-le-kie-ma-ten, be-diur-te-be-te, di-gua-ri-ma, gai-tue-ra-man, ge-ra-tuor-du-ko.* Ahal dela, I aurretik dela batez ere, ez nuke honelakorik egingo, baina egitea ez daiteke gaitzets.

4) Baina argi. Badago hemen kontuan eduki beharreko arau zuzentzaile bat. Lehenbizi, ez da berdin bi bokal berdinez ala ezberdinez bat egitea. Berdinen artean, bokaletariko bat desagertu egiten da. *Ikusi inoiz = i-ku-si-noiz.* Hemen I bat zeharo ezabatu da, apur bat luzeago ahozkatzen bada ere. Ez dago egon ere bi bokal berdinez silaba bakarra egiterik, bat galdu gabe. Bigarren kasuan, ordea, bokal ezberdinez silaba bakarra egiten denean, silaba bat galdu da, baina ez bokalik. *Daukate orduan = dau-ka-teor-du-an.*

Silaba bakarra egitean, bi bokalek hor jarraitzen dute, elkarri loturik bada ere. Horrek esan nahi du hitza osorik entzuten direla. Bokal berdinez silaba bakarra egitean, hitz batek zati bat galtzen du: *i-ku-si-noiz*. Hemen *inoiz* hitzak zati bat galdu du, *noiz* bilakaturik. Orduan, batez ere hitz laburrak direnean, hitzaren zati handia galtzea gerta daiteke. Adibidez *bi hil*, –hatxerik ahozkatzen ez duenaren ahoan-, bat egin eta *bil* kantatzen bada, *hil* hitzaren gehiena galdu da. Gainera gertatzen den hitza beste hitz oso ezagun bat bilakatu da: *bil*. Bi silabako hitzak jarririk ere, arriskugarri da. *Dauka ate = dau-ka-te.* Hemen *ate* hitzak erdia galdu du eta entzuten den hitz bategina *daukate* da, beste hitz oso ezagun bat.

Beraz, bi gauza eduki behar dira kontuan. Alde batetik hitzak bere izatetik zer proportzio galtzen duen eta bestetik sortzen den emaitzak ea nahaspiderik dakarren, oso hitz ezberdina eta ezaguna den aldetik.

Hitz baten galera proportzionala bistan dago handiagoa dela, hitza laburrago denean. *Komeni ikusterik = komenikusterik*. Galduriko I hori gora behera, bi hitzak sobera adieraziak geratzen dira. Galera proportzional txikia eduki dute. *Da han*, ordea, *dan* egiten bada, ia erdia galdu da eta gainera hitz berri nahasgarria sortu. *Ari inoiz = arinoiz* egiten bada, galera proportzionala txikiagoa da, baina hala ere nahiko handia. Eta gainera *inoiz* barik *noiz* entzuten.

Bokal ezberdinez hori egitean, hitzaren zatirik galtzeko arriskurik ez dago, baina bai nortasuna galtzeko edo lorrintzeko. *Da hil*, hatxerik ahozkatzen ez den tokietan, *dail* kantatzen bada, hitzak osorik entzuten dira, baina itxura arraz diferentez. Nortasun gabe.

Arlo guzti honetan kontestuak asko erabakitzen du. Segun esaldia nola datorren, kontestu batean ondo dagoen jokoa bestean gaizki gertatzea ez da harrigarri. Ez dago, beraz, arau matematikorik ematerik. Esanak laburturik:

A) I eta U bigarren direnean, egokiena da hitzetik hitzera bi bokalak silaba bakarrean biltzeko.

B) Beste guztietan ere egoki da, I edo U atzetik direla okerren delarik.

C) Kontuz bi hitzetariko bat edo biak laburrak direnean, batez ere bokal berdinak badira.

# VII

# HITZ SINONIMOAK ETA ANTZEKOAK

Neurriaren beste giltz handi bat hitz *sinonimoak* eta *antzeko hitzak* dira. Sinonimoak, adiera batean behintzat, gauza berbera esan nahi duten hitz ezberdinak dira. Esaterako, *maiz-sarritan, jausi-erori, irten-atera, etorri-jin* eta abar. Honek aukera handia ematen du, zeren, gauza bera esateko, silabaz ezberdinak diren hitzak baldin badira, komeni zaiguna sartuko dugu. Asko al dira hitz horiek? Ez gutxi. Eta gainera hitz oso erabiliak. Ia esan daiteke ez dagoela hitz garrantzitsurik, bere sinonimorik ez daukanik. Hizkuntzaren dispertsio edo sakabanatze hau, beste ikuspegi batetik begiraturik, kaltegarri gerta liteke zenbait gauzatarako. Bertsotarako, ordea, badauka bere alde on handia.

Beste hitz asko, sinonimoak izan ez arren, antzekoak dira eta, kontesturik gehienetan, berdin da bata nahiz bestea erabili. Esaterako, *erre* eta *kiskali* ez dira sinonimoak, baina gehienean ez dira bien arteko aldea nabarmentzeko erabiltzen. *Gernika erre zuten, suak erre ditzan, erreta negok* eta abarren ordez *Gernika kiskali zuten, suak kiskal ditzan, kiskalita negok* esatea ia berdin da. Antzeko hitz hauek ere ez dira gutxi. Eta gehienean ez daukate silaba kopuru bera. Hortik neurtzeko komenentzi handia.

Hitz sinonimoak eta antzekoak ez ezik, hitz guztiz ezberdinak ere kontestu batean berdintsu gerta daitezke. Demagun *jipoi ederra hartu nuen* esatera noala. Hiru hitz daude hemen: *jipoi, eder, hartu*. Hitz bakoitzaren ordez beste hainbat jar daiteke, antzekoa ere izan ez arren, kontestuan egoki datorrena.

*Jipoi*: paliza, astinaldi, beroaldi, karga, egur, zigor, zorro, fardel, pasada, pasio, sarri, erregalu... *Ederra*: ona, galanta, handia, polita, dezentea, izugarria, biribila, zorrotza, egundokoa, mundiala... *Hartu*: batu, bildu, jaso, irabazi, harrapatu, ekarri, sufritu, jasan, aurkitu, lortu, inguratu, leporatu, bizkarreratu...

Hitz hauekin mila konbinapen egin daiteke: *astinaldi galanta irabazi nuen, beroaldi izugarria bildu nuen, zorro mundiala leporatu nuen, zigor polita ekarri nuen* eta abar. Kontestu batean kantatzen dela emanik, batetik bestera alde funtsezkorik ez dago, bai ordea ñabardurena, eta hortxe dago aberastasuna. Ez da berdin ironiaz ala serioski ala hunkituki ari. Dena dela, hau beste kontu bat da. Hemen axola zaiguna da hitz oso ezberdinez esanahi berdintsua kanta daitekeela. Beraz, hitz baten ordez beste bat sartzeko aukera handia dago eta hori neurrirako eskuera oparoa da.

Baita errimarako ere. Bi hitzek, silaba kopuru bera eduki arren, esanahi berdina badaukate, errimarako ere bide handia irekitzen dute. Adibidez, *galtza* eta *praka*. Neurrirako bata nahiz bestea berdin da, baina ez errimarako. Gainera kontuan eduki behar da hitz askok, silaba kopuru bera eduki arren, deklinatzean, silaba baten aldea har dezaketela. Esaterako, *puska-zati*. Baina gero *puska-zatia, puskaren-zatiaren, pusketan-zatietan* eta abar. A-z amaitzen diren hitzek, deklinatzean, silaba bat gutxiago daukate gehienean. Artikulu mugatzailea eranstean, hitza lehenean geratzen da. Beste guztietan, ordea, A artikuluak silaba bat gehiago ezartzen dio.

Arau hau hizkuntza mintzatuan ez da denean berdin. Toki askotan *denda*, adibidez, honela deklinatzen da: *dendea, dendearen, dendeari, dendan, dendatik*... edo *dendia, dendiaren, dendiari, dendan, dendatik*... edo *dendie, dendien, dendieri, dendan, dendatik*... Ikusten denez, kasu batzutan, –non, nondik, nora...– deklinabide komunari darraizkio.

Euskara baturako beste eredua onartu bada ere, A organikodun hitzak honela deklinatzea ez da inola ere lokalismoa. Bizkaieraren eremu osoan era horretara deklinatzen da eta gipuzkeraren zati handi batean ere bai. Beste euskalkien berri zehatzik ematen ez naiz ausartzen. Lokalismoak deklinabide beraren barruan letozke: *dendea-dendia-dendie-dende-dendi* eta abar.

Esanak esanik, goazen orain hitz sinonimoen eta antzekoen zerrendak ematera. Ez dira noski zerrenda osoak. Horretarako lan luzea egin beharko litzateke. Agian gai honek lan exhaustiboa merezi luke, bertsolaritzarako ez ezik, hizkuntza osorako eta euskalkien hurbilkuntzarako. Dena dela, hemen datozen zerrendek, bertsogintzarako behintzat, bide handia ematen duten dudarik ez izan.

## SINONIMOAK

Abade, apaiz, apez
Adin, edade
Adore, kemen, balore
Agian, akaso, beharbada, ausaz
Agindu, manatu, ordenatu
Agindu, promestu
Agirian, publikuan, bistan
Agudo, azkar, arin, fite, bizkor
Agur, adio
Agure-atso, zahar, adintsu
Agurtu, despeditu
Ahal, botere, ahalmen
Ahal ukan, ahal izan, ezan (dezaket, nezake...)
Aipu, aipamen
Alai, alegera, arrai, alegre
Aldapa, aldats, malda
Aldatu, kanbiatu, mudatu
Alde, alderdi
Alde egin, defendatu, aldeztu
Alde egin, ihes egin, eskapatu
Altzo, magal
Amaitu, bukatu, akabatu, finitu
Anai, anai-arreba, neba-arreba, senide, haurride
Andre, emakume, emazteki, andere
Andre, emazte, esposa
Arbuio, mesprexu, desprezio
Argi, klaru, klar
Arras, zeharo, guztiz, erabat
Arreta, atentzio, kontu
Arretaz, kontuz
Arrotz, kanpotar
Aski, nahikoa
Asko, anitz, franko
At, kanpo, landa
Aterpe, lehorpe
Atseden, atsen, deskantsu
Atsekabe, nahigabe, desgustu
Atxakia, aitzaki, estakuru
Atxiki, itsatsi
Atzeman, harrapatu
Aukera, okasio, parada
Aurka, kontra
Aurren, aurrenengo
Azaldu, esplikatu
Azaldu, agertu
Azaldu, aurkeztu, presentatu
Azken, azkenengo
Baina, halabaina, ordea, ostera, hala ere
Banatu, partitu
Barru, barren, barne
Base, oinarri
Batzarre, bilera, bilkura
Batzutan, noizbehinka, noizik behin, tarteka, lantzean behin
Begira, beha, so, adi
Behartu, obligatu, derrigortu, arazi
Behintzat, bederen
Bekaitz, inbidia
Bentzutu, menperatu, dominatu
Bera, bigun, beila, samur
Berde, orlegi
Berehala, derrepente, kolpera, atoan, bat batean
Berezi, apartatu, banatu, separatu
Berri, albiste, albiriste, notizia
Bestela, bertzenaz, ostantzean, osterantzean
Bidali, igorri
Bider, aldiz
Bihi, ale, garau
Bildots, arkume, axuri
Bildur, ikara, izu
Birao, maldizio, madarikazio, madarikapen
Bistan, agerian
Bota, jaurtiki, jaurti, egotzi
Boz, abots
Bultz egin, bultzatu, sakatu

Burugogor, egoskor, terko
Buztan, isats
Damu, damutasun, garbai
Deabru, debru, demonio
Debalde, dohainik, dohan, gratis
Debekatu, galerazi, galazo
Deitu, dei egin, hots egin
Dena den, dena dela, nolanahi ere
Denak, guztiak, oro
Denbora, eguraldi
Denbora, ordu, oren, tenore
Dilindan, eskegita, zintzilik, dingiliska
Dohakabe, zoritxarreko, zorigaitzeko
Dohatsu, zoriontsu
Duda, zalantza
Ebaki, moztu, eten
Ebatzi, erabaki
Ediren, idoro, topatu, aurkitu, kausitu
Egundo, egundaino, inoiz, nehoiz, sekula, inoiz ere
Egunsenti, egunabar, argihaste, askorri, goiztiri
Ehortzi, lurperatu, enterratu
Eltze, lapiko
Enda, arraza
Enpaidu, enparau, gainerako, gainontzeko, gainerateko
Entzun, aditu
Epe, plazu
Era, modu, manera
Eraso, atakatu
Erantzun, ihardetsi
Eri, gaiso
Ero, zoro
Erpe, hatzapar
Erraldoi, digante
Errenditu, emore eman, etsi
Erresuma, erreinu
Errez, erraz, aisa, aise
Erro, sustrai, zuztar
Erru, kulpa
Erruki, gupida, urriki, urrikalmen, urrikalmendu
Eskegi, zintzilikatu
Esnatu, ernatu, itzarri, itzartu, iratzartu
Etekin, probetxu, onura
Eutsi, sostengatu, mantendu
Ezberdin, desberdin, diferente
Ezer, deus
Ezin dut, ez dezaket
Fidantza, konfidantza
Fido ian, fidatu
Froga, proba, aproba
Gaitzetsi, kondenatu
Galtza, praka
Gartzela, presondegi, espetxe
Gaur, egun
Gehiegi, larregi, lar, gehitxo, gehixko
Gela, ganbera, koartu
Geroztik, geroztikan, harrezkero
Gizakume, gizaki
Gizaldi, belaunaldi
Gizalege, edukazio
Gizon, senar, esposo
Gizon, gizaseme, gizonezko
Gogaitu, aspertu
Gomuta, oroitzapen, oroitza
Gorde, ostendu, izkutatu
Goretsi, goraipatu, goraldu, goratu
Gorpu, hilotz
Gorputz, soin
Guda, gerra, gerla
Gurpil, arroda, txirringa, errubeda
Gustora, pozik, kontent, kontentuz
Hainbat, aina, adina, beste, bezainbat
Haitz, arroka, harkaitz
Hartu, errezibitu
Hats, kirats, antz
Haur, ume
Hautatu, aukeratu
Hautu, solas, eleketa, berriketa
Hautsi, apurtu, eten
Heldu, oratu, atxiki
Hertsi, hetsi, itxi, zarratu
Higuin, nazka, narda, enpagu

